








# Indarkeriarik gabeko 500 ekintza
## Historia kontatzeko beste modu bat

bidea helburu taldea
sabino ormazabal

MANU ROBLES-ARANGIZ INSTITUTUA

| | |
|---|---|
| *Egilea* | Sabino Ormazabal eta Bidea Helburuko beste taldekideak (www.bideahelburu.org) |
| *Itzulpena* | Ibon Plazaola, Olatz Oiartzabal, Miren Etxeberria eta Ramon Iriarte (Bakun Itzulpenak) |
| *Testuen orrazketa* | Joseba Ossa |
| *Maketazioa* | Roberto Gutierrez |
| *Argazkiak:* | Larzac, Argazki Press eta Judimendiko Momotxorroak |
| *Bidea Helbururen logoa* | Lander Fernández de Arroyabe. Argazki Press |
| *Editorea* | Manu Robles-Arangiz Institutua Fundazioa<br>Barrainkua 13. 48009 BILBAO<br>www.mrafundazioa.org |
| *Inprimategia* | Bilbograf |
| *ISBN* | 978-84-935380-5-7 |
| *L.G.* | BI-1702-09 |

AURKIBIDEA

## Aurkezpena

Memoria, interpelazioa eta gonbidapena.

Hori guztia duzue lan hau. Eta hori guztia delako argitaratu dugu. Eta eskertu ere eskertzen dugu, sindikatuko militanteoi egindako oparitzat hartu nahi baitugu.

Askatasun-jardueren memoria ("oroitzen al zara?"). Herrialde, talde eta pertsonen sufrimenduaren gomuta, hortaz. Neke eta minen oroitzapen gaurkotua, eta mendekotasunen aurkako txertoa ere bai. Izan ere, mendekotasuna ahanzturaren teknologia da, disidentea deuseztatuz ezarritako bakea, alegia. Aitzitik, pasioaren memoria etorkizuneko pasio subertsiboa da.

Etengabe interpelatzen duen memoria ("zer deritzozu?"). Ez, noski, gure duintasunari, ez eta gure ego eta interesei ere. Gure adimenari interpelatzen dio, zuzen-zuzenean. Biktimaren erantzun mimetikoa, eta horrekin batera, geroagoko irainak justifikatu baino egin nahi ez duen hura, indarkeriaz baliatzen den horixe, desarmatu egiten baitu indarkeria-ezak. Izan ere, indarkeria eta apologia eskutik helduta doaz, estu-estu loturik. Bidezkoa dena, etikoa dena –horrek bai indarra!– berez justifika baitaiteke ("zer nahi zenuen, bada, egitea?"). Indarkeriak behar du, behar izatekotan, justifikazioa. Utz dezagun, beraz, bitartekoen zilegitasunari buruzko berdin da zer eztabaida, eta hauts dezagun boteretsuen galbahea; ez dezatela errudun bihurtu pertsona zuzena, legetik kanpo dagoena, disidentea.

Elkarrekin lan egiteko gonbidapena ere baden interpelazioa ("nahi bazenu..."). Kontua ez baita, soil-soilik, bestea suntsitzeari edo formateatzeari uko egitea. Kontua, zalantzarik gabe, indarkeria-eza bera da: lan itxaropentsu askoa, horratik. Gizakia eta gizadia berreskuratzeko itxaropena, eta hirugarren habea, anaitasun errepublikanoa, eraikitzeko ahalegin kolektiboa. Borondate militanteari egindako deia ("ahal izango bazenu..."), bai eta oso egoki iruditzen ez zaizkigun borroka-moldeak aldatzeko deia ere.

Militantzia. Ezin zuen bestela izan. Militanteak baitira kontrahistoria honetako protagonistak. Lan eskerga honen egileak ere horixe baitira: militanteak. Zer dira, ba, jende ona Bidea Helburu taldeko kideak.

Gure egin nahi dugu liburu hau; gure, gu ere militante garen aldetik. Gu ere handituz doan errepresioak harrapatu baikaitu dagoeneko; gure jarduerak itsusten dizkigute: grebak, manifestazioak, piketeak, eta gainerako ekintza

guztiak. Hori guztia pairatzen ari baikara, ederki ulertzen dugu kontrakronika hau. 500 adibideok, eta beste asko, inspirazio-iturri dira guretzat, bai eta basailu zahar eta berrien aurkako beste horrenbeste ekintza kolektibo sortzeko ziri aparta ere.

**Xabier Anza**. Manu Robles-Arangiz Fundazioko Presidentea.

Bilbo, 2009ko ekainaren 3a.

1. HITZAURREA

# LAKABETIK
# AURPEGIRIK ESTALI GABE

Italiako Partito Radicale alderdiko Danielo Dolciren hitzaldi bat itzuli nuen orain dela 35 urte, "Obedientzia dagoeneko ez da bertute" izenekoa. Indarkeria-ezaren inguruko ekintzetan hainbeste urte eraikitzen eman eta gero, kontzeptu horretan sakondu dezaket gaur egun, eta are beste batean ere, askoz ere askatzaileagoa: gizakiok ez gaude obeditzeko eginak, libre izateko baizik. Askeak gara definizioz, izan bagarelako, pertsona garelako; jaiotzeagatik aske. Izatetik beretik, izan banaiz. Eta, jakina, libre naiz, inork nire askatasuna legitimatu behar ez izateko moduan libre; are gutxiago gobernu batek. Izan ere, nire askatasuna niri baizik ez dagokidan kontua da.

Berdin da bere buruari zer izen ematen dion, inongo estaturekiko ez dugu betebeharrik, ez eta goikoek sortu duten beste edozein motatako gobernurekiko ere; ez behintzat hura hautatu edo ezartzeko era zuzenik izan ez badugu. Jo dezagun hautaketa hori askea eta zuzena izan dela: gizarte horretan bereziki kezkatzen nauten alderdiei buruzko azalpenak eskatzeko eskubidea izango dut beti, baita aipatutako kasuan ere.

Bizileku dudan gizarteri dagokionez, berriz, hartan parte hartu nahi izatea ez da, inondik ere, iraina, prozesu kolektiboari egiten zaion ekarpena baizik.

Gobernuek, oro har, eta nonahiko administrazioek, bereziki, ezkutuan gorde nahi izaten gaituztenean, zokoratu, giltzapetu, espetxeratu, sakailatu, desagerrarazi nahi izaten gaituztenean... hori guztia gertatzen denean, orduantxe sortzen dira, indartsu eta itxaropenez, nolanahiko borroka-motak eta erresistentzia-ekintzak; orduan sortzen dira, halaber, Desobedientzia Zibila eta Indarkeriarik Gabeko Erresistentzia Zibila esaten zaien jardunbideak.

Izan ere, baten batek mendean hartzen gaituelarik, nola eskatuko digu inork herri bat osatzen dugun pertsonoi txintik ere ez esateko? Nori irudituko litzaioke hori zuzen? Horri buruz ezer esaten duen paragraforik eskura ez dudan arren, gizaki naizen aldetik nonahi aurkitu dut nik giza duintasuna: nire pertsona izateaz ari naiz, noski; eta pertsona izate horrek berekin dakarren koherentziaz. Zenbat aldiz ez ote digute agindu isil-isilik egon gaitezen, non

eta nork bere larrutan sentitu ez duen horrenbeste egintza doilorren indarkeria: zenbat eta zenbat irain, hertsapen, gehiegikeria, jipoi, tortura, hilketa... Eta isilik egoteko eta haien gaizkide izateko eskatzen digute, arraioa!

Nik ezin dut, ez eta, nire gisan, milaka eta milaka herritarrek ere. Horrela jokatuz gero, ez al genuke, bada, sentituko saldukeriatan gabiltzanik? Bai, noski; eta, jakina, geure burua saltzeaz gain, gizateria osoa ere salduko genuke, dudarik gabe.

Ez beste ezergatik, oinarrizko erreminta hauek ditugu jomuga, zergatik eta inolako azokatan erosi behar izan ez ditugulako. Doakoak baitira, edonork eskura izan ditzake, askeak dira, haien premia dugunean erabil ditzakegu inori baimenik eskatu gabe; beti eskura, inori aurre egitera edo ezeri eustera aginduko digun nagusirik gabe. Pertsona bat agindu bati jaramonik ez egiteko edo zernahi arau desobeditzeko eskubideaz baliatzen den bakoitzean, gizateria osoa ausartzen da bere kontzientzia kolektiboan sakontzera.

Bide horretan, noski, trinkotu egiten gara, sendotu; eta halaber sakontzen dugu heldutasunean, konfiantzan, jakiturian, askatasunean eta batasun-sentipenean; baina, batez ere, espiralean dabilen energia sortzaile horrek gure izate kolektiboa bazkatzen du, eta haren premia duen edonori jaten eta edaten ematen dio.

Desobedientzia zibileko egintzak erro-errotik sustraitzen dira justiziari buruzko halako zentzu batean, edonongo eta edonoizko ikuspegitatik kanpora, betiere; arriskua nagusi den lurraldeetan sartzen dira, eta erreminta horietaz baliatzen diren pertsonek zorrotz begiratu behar izaten diote orduan beren ekintzen izaerari, eta orobat ekintza horiek gauzatzeko moldeari. Hala, bistan denez, sormen eta askatasun handiko pertsonak dira haiek, bai maila pertsonalean, bai maila kolektiboan.

Erresistentziazko jardunbide pasibo oro une larrienetan azaleratzen da: ate guztiak ixten direla dirudienean, hedabideek bizkarra ematen digutela eta etsipena beste irtenbiderik ez dagoela dirudienean, alegia; orduantxe sortzen da, baiki, erresistentzia: umilazioari, bakardadeari, itxaropenik ezari eustea posible ez denean. Orduan, izan ere, kontuan har gaitzaten helburu nagusi bihurtzen da, gehiegikeria- eta bidegabekeria-egoerei aurre egin beharrez.

Geroago etorriko da sortzeko beharra. Dena dela, inori ez diogu utzi behar ustelkeriaz, gezurraz, ezkutukeriaz, txutxu-mutxuez kirastu gaitzan, ez eta hori guztia ezkutu-ezkutuan ezar dakigun ere. Indarkeria-eza abiapuntu duten ikusmolde eta ekintzen bidez, egia, sormena, ikerkuntza, lankidetza eta parte-hartzea biltzen dituen toki batean baizik ez gaitezke jar; aurpegirik es-

tali gabe, hortaz, gure bizitzako ostertza zabaldu eta aldatzeko prest betiere. Azken buruan, libre izatea da kontua, bai eta geure hatzaparretatik ere.

Gure herri honetan egin diren jardunbide guztietatik lagin txiki bat baino ez du jasotzen bilduma honek. Bada beste askorik, noski: albistegietan erakusten ez dizkiguten gauza horietako asko eta asko, alegia; pertsonok egia esateko arriskua gure gain hartzen dugun bakoitzean gertatzen eta egiten diren gauzak; bizitzaren funtsari koherentziaz erantzun nahi izaten diogunean gertatzen eta egiten diren gauzak; azken batean, duin jokatu nahi dugunean gertatzen eta egiten diren gauzak.

**Mabel Cañada**. Ilusio-diseinatzailea.

2. HITZAURREA

# BARTZELONAKO GRÀCIA AUZOTIK BIDEAN BARRENA GOAZELA JARRITAKO HARRIEI AURRE EGINEZ

Harria bota eta eskua gorde ala harria gorde eta eskuak batu? Ez al da, ba, hobeto esku gutxi baino gehiago batzea? Zuri-beltz mugiezina ala *tots els colors del verd*, Raimonek esango zuenez? Geldi dagoen argazkia ala mugitzen ari den filma? Aurpegia erakutsi ala ispiluaren aurrean ere hura ezkutatu? Tankan itxiriko konpartimendu polarizatua ala erabateko zehar-bide lausoa? Zer-nola eraiki nahi dugu? Elkarri lotutako disidentzia-sarea ala bakartze termiko kriminala? Ez ote ditugu oraindik prezioa eta balioa gehitxo nahasten? Arrautza ala oiloa? Betiko eztabaidek bere horretan jarraitzen dute, konpontzeke: emantzipazio kolektiboa eta gizartea aldatzeko asmoa; zer bitarteko darabiltzagun eta zer helburu ditugun jomuga; zer forma eta zer eduki… Eztabaida horien guztien aurrean, koherentziaz jokatzeko asmo argia dugu. Urduri bizi gara gaur egun, mundu osoan gerra piztu dute beldurra eragiteaz eta indarkeria erabiltzeaz horrenbeste dakitenek: beldurraren eta ikararen perfekzionistek, alegia; estatuaren punta-puntan daudenek, noski.

Bidaia honi ekin baino lehen, esan dezagun bidenabar badela ezin ukatuzko premisa bat, eta premisa hori ederki asko adierazten dutela Galeanoren hitz hauek: “haien modukoak ez izatea”, alegia. Onar dezagun, halaber, Klein-en hitzak gure eginez, memoria dela antidoto onena hondamendiaren kapitalismoari aurre egiteko. Erants diezaiogun horri, oraintsu modan dagoen Lakoff gogoratuz, gure *frame*ak ez daukala zertan haiena izan; guztion gudu-zelaia ez dela berbera, nahiz eta haiek belaunikaturik ikusi nahi gaituzten beraienean. Haien logikaren desertore izan gaitezen, eta sor dezagun geurea; leku berriak sortzen jakitea politika askatzaile askoa baita, gaur egun inoiz baino areago. Paine gogoan zuelarik Mariano Ferrerrek Bartzelonan esandako hitzok aipa ditzagun: “Norberaren askatasuna gorde nahi duenak nahitaez gorde beharko du etsaia bera ere inoren arbitrariotasunetik; bestela, norberaren aurka erabil litekeen aurrekaria sor liteke”. Gehi diezaiogun horri guztiari Freireren eskola pedagogikoak irakatsi diguna: bideak zapaldua askatzen duela, baina bide horrek berak askatzen duela, orobat, zapaltzailea. Izan ere, bideak gizakiago

bihurtzen gaitu. Busti gaitzala erabat patriarkatuak eragindako horrenbeste indarkeriaren jomuga izan den feminismoak. Gizarte-mugimenduen historia mamitsua –mamitsua, bai, baina orobat kontraesankorra; nolanahi ere, aberatsa eta dinamikoa–, hari buruz geratu den memoria osoa, ezabatu nahi dutenen sinplekeria inozoa saihets dezagun, kosta ahala kosta. Nahasi orain hori guztia koktel-ontzia gora eta behera maneiatuz, eta... hara! Amaierarik gabeko ondare intsumisoa, entziklopedia ia infinitua; hori bai nahasketa ederra, den-dena nahastura ezinago libre batean baturik: premiak eta erradikaltasuna, desobedientzia eta konpromisoa, irudimena eta kontra-boterea, etika eta elkartasuna...

Onar dezagun behingoz: akats batek ez du inoiz hurrengo akatsa zuritzen. Sekula ez. Are gutxiago, akatsa geuk egina baldin bada. Boteredunak besteak badira, euts diezaiogun geuk etikari: juzkatzeko era bikoitzik gabe, inbutuaren legerik gabe, isiltasun hautsezinik gabe. Gure uste apalean, halaxe jokatu beharko genuke; horratx gure hautua. Betiere, printzipio hutsek zuzendurik jokatzeko; eta beste historia horri erreparatuz gero, berriz, borrokan eraginkor jarduteko. Diruarekin zerikusirik ez duen eraginkortasunaz ari gara, noski; izan ere, gure hau gizatasunari dagokio erabat. Bidean aurrera goazela zer gal dezakegun jakin behar dugu. Horretarako, bistakoa denez, koherentziaren printzipioa landu behar da, nahiz jakin badakigun bidean barrena goazela ez direla gutxi izango jasoko ditugun jipoiak; beharbada horregatik, logika antiterrorista eroaren ertzetan jokatu behar dugu, leku gehiegitxotan metatutako horrenbeste sufrimendu guztiak gorabehera.

Ireki diezazkiogun gaur-bihar ateak erdiz erdi desobedientziari; izan ere, beldurra eta obsesioa bide bakar bihurturik, gobernagarritasun autoritario zinikoa nagusi da nonahi; haserrearen eta desberdintasunen aldirietan sorturiko indarkeriari aurre egiteko aitzakiak –ez ote da hori aitzakiarik makurrena?– kudeaketa ezinago doilor, bidegabe eta maccarthista ekarri du; estatuko arrazoi makurrena nagusitu zaigu garaiotan –gure artean geratzen diren disidentzia apurñoei ostikoka erantzuten dielarik, ez ote da, bada, estatuko arrazoi hori estatuaren morroi bihurtu?–. Desarma ditzagun, bada, horiek guztiak. Gero eta gizarte indibidualistagootan, badirudi arazo nagusi bihurtu zaigula ezerekiko loturarik ez izatearena: Baummanen likidotasun ospetsua, alegia. Halatan, bada, edozer erabaki inoren esku utzi ordez, nork bere buruaren arduradun izan beharra aldarrikatzen dugularik, ausart gaitezen onartzera ez dagoela desobedientzia baino eskola hoberik lotura guztiak josten ikasteko –gizarteari eta komunitateari lotzen gaituzten josturez ari naiz, haiek baitaude gaur egun kolokan eta hautsirik–. Gorputz-arimaz hartutako konpromisoa da guk behar duguna; eta, jakina, konpromiso mota hori bere-berezkoa du desobedientziak, haren konpromisoa ez baita hitz hutsekoa, hitzak haizeak

baitaramatza ezinbestean. Baina mehatxua ere bada konpromiso hori: eredu onarena eta gauzak ongi egitearena, alegia.

Orain dela urte asko hasi zen eztabaida guretzat: zenbaitek ezarritakoaren ernamuinean erroturik dagoen inposaketatzat jo izan dugu beti indarkeria –indarkeria oro–; gure ustez, hura ez da inoiz aukera bat izan. Ongi asko baitakigu jakin, adibideak ditugu, konta ezin ahala adibide, amaiezinak ia; bilduma honetan adibide horietako asko eta asko aurkituko dugu: opari ordainezina, zalantzarik gabe. Dena dela, adibide horiek ez dira A edo B-ren metonimia: zorionez, justiziazko eta askatasunezko komunitateak egiteko, abezedarioaren logaritmoa zabal zabala da. Era cartesiarrean adierazirik, hauxe da “Historia kontatzeko beste modu bat” honen ekarpen nagusia: haize fresko-freskoa dakarrela; gure neuronentzat bazka aproposa, boterearen jukutriak biluzteko errepertorio ia infinituaren batura biderkatzailea baita hau. Haize freskoa, beraz, eta are hegoaldekoa, bai eta tsunami desobeditzailea ere.

Azken buruan, matematika huts-hutsa –dagoen zientziarik zehatzena, zientzia zehatz bakarra, agian–, aldakuntza soziala ere horretan baitatza. Izan ere, keinu ñimiñoenetan bizia bera jokatzen dugu. Halaxe erakutsi zigun Howard Zinnek *Ibilian doan trenean inor ez da neutrala* izeneko liburuan: bidean aurrera goazela agertzen zaizkigun harri-koskorrei aurre egiteko (harri horietako batzuk bestek jarritakoak dira; beste asko, aldiz, guk geuk jartzen dizkiogu geure buruari), Zinnek indarkeria-ezazko desobedientzia zibilean sustraituriko konpromisozko bidea marraztu zuen. Haren bizi eta borroken sintesia hauxe izan liteke: aldakuntza erdietsiko badugu, keinu eta koherentzien istorio txiki guztiak batu eta biderkatu beharko ditugu, jardunbide txiki horien agregazioak baino ez baitezake ekar aldaketa; horixe da, izatekotan, bide bakarra.

“Harria bota eta eskua gorde baino nahiago aukeran aurpegia atera eta harririk ez botatzea”; horra nire ohartxo honen jatorrian dagoen esaldia asmatu zuen adiskideak zer-nola adieraziko zukeen hemen esaten ari naizena. Horixe baita honen guztiaren ernamuin eta giltzarria: aurpegia ateratzea; askatutako espazio arra bakoitzeko aurpegia ateratzea. Batetik, horretarako premia larria dugulako; bestetik, berriz, plazer ikaragarria ematen digulako. Izan ere, beste etorkizun bat ereingo badugu, ezinbestekoa da kartografia berri bat sortzea, alde batetik beste batera gure buruak, gure eguneroko bizitza eta gure jardunbide osoa berriro marrazteko. Hor baino ezin baita eraiki etorkizuna; horixe da utopiaren geroa; horixe, Pere Casaldàligak dioenez, eu-topia: den-denok bilduko gaituen tokia.

**Gabriela Serra.** Kataluniako mugimendu bakezaleko kidea.

**David Fernández.** Kazetaria.

# INDARKERIA EZETIK INDARKERIA-EZARA

> *"Historiaz haraindi (edo honaindi, agian) memoria dago, eta memoria herrien ondare ukaezina ere bada. Memoria erresistentzia da. Garaileen kontakizuna izan da beti Historia, bai eta gu kontrolatzeko eta kontu hartzeko tresna sotila ere. Dena dela, jada hilik, gauza bizigabeen bilduma halako batean pentsarazten digun zer horri buruzko ikusmolde fosildutzat baino areago jo behar genuke 'historia'; memoriaren kontakizunaren ahalmen nagusia, izan ere, beste nonbait datza: guk geuk eta gure moduko jendeak belaunaldiz belaunaldi metatu dugun esperientziaren balioa gaur egun ere indarrean iraunaraztean, alegia. Esperientzia denon esku jartzea ekintza politikoa da, elkarri jauzitako sareak josten jarraitzea baitakar horrek, eta horrenbestez, erresistentzia-bide oparo askoa jendaurrera eramatea ere bai".*
>
> *Josemi Lorenzo Arribas, "Bidezko desobedientzia", 2001.*

Begien bistan duzuen hau Bidea Helburu taldeak egindako bilduma bat da, eta inork kontatzen ez duen Historiaren berri ematea du helburu. Alde batetik, Euskal Herriko indarkeria-ezaren aldeko talde ugarirentzat zedarri izandako hainbat eta hainbat gertaera, diskurtso eta data historiko aipatzen dira; beste alde batetik, berriz, gure memoria kolektiboan itsatsirik dauzkagun ekintza ez indarkeriazko, desobeditzaile, baketsu, irudimentsu andana berreskuratu dugu. Badira boikot modukoak, kolaborazio-eza edota desobedientzia zibila proposatzen dutenak; badira ere zenbait irtenbide eman eta hainbat bide abiarazten dituztenak; badira, halaber, beste zenbait ate ixtea dakartenak... Baina, edozein moduz, bada zerbait denek elkarrekin baterako dutena: indarkeriazkoak ez diren ekinbide eta bitartekoak darabiltela, alegia. Denek egiten diote ihes historiari buruzko ikuspuntu hertsi eta norabide bakarrekoari, horren azpian historia indarkeriazko aurrez aurreko bat balitz bezala ulertzeko saiakera bat baino ez baitago beti.

Hemen bildu ditugun kasu hauek guztiok eta jaso ahal izan ez ditugun beste askok argi adierazten dute Historia bat baino gehiago daudela; izan ere, istorio asko eta asko daude. Ekintza armatuen, alderdikeria eta nagikeriaren

esparru hertsietatik kanpora ere bada haizerik. Eta, gainera, askoz ere osasuntsuagoa da haize hori.

Gure historia ez da murrizten boteretsuez eta uniformedunez esaten zaigunera. Dena ez da mugatzen alderdi eta erakunde zibil, militar eta erlijiosoen dinamikek ezartzen dutenera. Herri honetan nabarmentzen den gauza bakarra ez da ETA; eta, jakina, haren alde edo kontra lerrokatzea ere ez da egitea dagokigun gauza bakarra. Ez horixe. Gure buruak zailtzeko ez dago ezer hoberik hemen aipatzen diren ehunka adibideei begiratzea baino. Horri guztiari buruz ari delarik, honela dio Howard Zinnek: “dagoen gauza bakarra ez da gerra, gerraren aurkako erresistentzia ere hor baitago; ez dago bidegabekeria soilik, orobat baitago bidegabekeriari aurre egiten dion matxinada; egoismoa ez da, inondik ere, begietaratzen zaigun gauza bakarra, eskuzabaltasuna ere ikus baitezakegu; ez daude, soil-soilik, tiraniak isilarazitako pertsonak, hor baitaude hari erronka jo eta aurre egiten diotenak; bihozgabetasuna ere ez da nagusi, bai baitago ulerberatasuna ere”.[1] Istorio horiek guztiak berreskuratu nahi izan ditugu bilduma honetan.

Sarri askotan aipatzen dira Gene Sharpek[2] 1973an jaso zituen indarkeriaeza eta desobedientzia zibilerako 198 metodoak. Honekin batera doa guk Euskal Herritik egin nahi izan dugun ekarpena; gainera, hemengo zenbait ekinbiderekin batera, munduko beste txoko batzuetako zenbait ekintza ere erakutsi nahi izan ditugu. Sharpen lan bikaina ziri aproposa gertatu zaigu gure zerrenda hau egiteko garaian.

Euskal Herriko erresistentzia zibil eta sozial askotarikoari buruzko historia aberatseko hainbat eta hainbat jardunbide kanpoan utzi behar izan ditugu[3]. Beste ezertan hasi baino lehen, beraz, barkamena eskatu nahi diegu hemen aipatzeke geratu diren guztiei. Oso posible da, gainera, bilduma hau irakurtzen duzuen zuetako asko ados ez egotea aipatzen ditugun honelako edo halako ekintzak hemen sartzeko egokitasunarekin. Esan gabe doa, noski, gure artean ere ez direla gutxi izan horri guztiari buruzko zalantzak, eta ez gare-

1 Howard Zinn: *Nadie es neutral en un tren en marcha*, Hiru, Hondarribia, 2001, 13. or.

2 Gene Sharp: *La política de la acción no violenta*, testu hori pdf formatuan irakurtzeko, jo helbide honetara: http://www.aeinstein.org/organizations/org/scannedPDFs/Nonviolent%20Political%20Struggle%20%20Spanish.pdf

3 Errepikapen hutsalik ez egiteko, hemen ekintza esanguratsuenak baino ez ditugu jaso; egon liteke, hala ere, ustekabean aipatzeke utzitzakorik. Askotan, lehenengo ekimena aipatu dugu, edo adierazgarriena, nahiz eta gero ekimen hori urtero ospatu. Demo, Zuzen eta Greenpeace moduko taldeen ekimen guztiak ere ez ditugu aipatu, errepikakorregiak ez izateko. Irizpide horrixe eutsi diogu manifestazioei eta efemerideei dagokienez, bai eta kongresuei eta jardunaldiei dagokienez ere; izan ere, haiek guztiak hemen aipatu bagenitu, gure lan hau ia amaiezina zatekeen. Oin-oharretan zehazten ditugun aipamenetatik aparte, erreferentzia gehienak egunkari hauetako urtekarietatik hartu ditugu: *Egin*, *Berria*, *Gara*, *Diario de Noticias*, *El Diario Vasco*, *Hitza*, *Andra*; askoz ere erreferentzia gutxiago hartu ditugu, ordea, *El País* eta *El Mundo* egunkarietatik.

la beti ados jarri. Azkenean, hala ere, dauden guztiak sartzea erabaki dugu –nahiz eta, berriro diogu, dauden hauek diren guztiak ez izan–. Gure ustez, hobe baita zenbait gairi buruzko eztabaida eragitea –hark amaierarik ez duela onartuz, betiere–: zer dira indarkeria-ezazko metodoak eta zer metodo baketsuak? Makinen aurka indarkeriaz ekin, bai ala ez? Noraino tenkatu soka, gure ekintzak erasokorrak izatera iritsi gabe? Zehatz-mehatz indarkeria-ezazkoak izan gabe, nola onartu haien osagarritzat gaizkiulertu ugari sor lezaketen zenbait ekimen? Ekintzen ikusgarritasun itzelekoak ez ote du haren doitasuna kolokan jartzen? Hobe da eztabaida hori bultzatzea, orain arte gertatutako guztia ahaztu eta gure belaunaldiari eta ondorengo guztiei beharrezko informazioa ezkutatzea baino; hura behar-beharrezkoa gertatuko baitzaigu, baldin norberaren irizpideari eutsi eta ekinbide sozial eta politikoaren forma ugariei buruz berriz pentsatu nahi badugu.

Gai asko daude oraindik zintzilik; egia da, bai. Haiei buruz eztabaidatzen jarraituko dugu, beraz. Baina indarkeriarik gabeko ekintzek badute dagoeneko ibilbide bat egina, eta hark martxan dirau oraindik ere. Behetik hasitako prozesu bat dugu, urratsez urrats egina. Hala ere, apaltasunez egindako bidea izanagatik, bizi izandakoa eta orain arte urraturiko bideak erakutsitako esperientzia oinarri duena: dagoeneko perspektiba historiko nahiz memoria kolektibo nahikoa badugu jakiteko indarkeriazko ekintzek ez dakartela samina baizik, eta besteen minaren aurrean bihozgogor bihurtzen gaituela, adiskide-etsai dialektika ezartzen duela, arerio politikoari bere gizatasuna kentzen diola, errebeldia militartzen duela, ateak ixten dituela, gero berriz eraiki behar izaten diren zubiak botatzen dituela, disidente guztien jardunbidea baldintzatzen duela, estatuaren indarkeriari bidea ematen diola, gizartearen partehartzea oztopatzen duela, eta gehiengo handia gerarazten duela... Aski da! Utziozue bidea indarkeria-ezazko aurrez aurreko zibilari, bestela ere nahikoa oztopo gainditu behar baititu. Lehergailuek ez dute begirik; indarkeria-ezak, ordea, begiak zabal ditzake.

Dena dela, sarrera honetan ez dugu hitz egingo –propio ez, behintzat– indarkeria-ezazko hautua egiteak giza duintasunaren etikari dagokionez dituen alde onei buruz. Beste zenbait aldiz egin dugu hori, eta gehiagotan ere egingo dugu, zalantzarik gabe; baina oraingoan bide horren baliagarritasunari begiratu nahi diogu. Aukera bat egitea, izan ere, haien guztien artean hautatu ahal izatea da. Eta hemen argi asko hauta dezakegu injustizia berririk eragin gabe nola ekin injustiziari aurre egiteko. Horri dagokionez, errepara Jean Marie Mullerren arrazonamendu egoki honi:[4]

4 “Significado de la noviolencia”, Indarkeria-ezazko Alternatiba baterako Taldeak itzulia, 1983ko ekaina.

"Indarkeria-eza oinarri duten erresistentzia-mugimendu guztiek egiten dute topo ezarritako botereen errepresioarekin (...) Indarkeriazko bitartekoak badarabiltzat, aurre egiten diodan injustiziari buruzko eztabaida iritzi publikoan eragin ordez, erabiltzen dudan indarkeriari buruzkoa eragiten dut ezinbestean. Hedabideek ez dute hitz egingo nire ekintzaren azpian dauden arrazoi politikoez, ekiterakoan erabili ditudan metodoez baizik. Iritzi publikoarentzat suntsitzaile bihurtuko nintzateke, ez besterik; eta, jakina, egindakoagatik ordain dezadala eskatuko du hark aho batez. Hala, botereak bere-berezkoak dituen errepresio-bideak ezarriko dizkit. Beraz, indarkeriaz baliatzen banaiz, nire arerioari bere-berezko duen indarkeria justifikatzeko behar dituen argudioak ematen ari naiz.

"Indarkeria-ezazko jardunbideari leial banatzaio, ordea, nire arerioaren zeregina errazteari uko egiten ari naiz. Eta rolak aldatzen ditut: indarkeriaz baliatzen banaiz, defentsiban jartzen dut nire burua, etengabe justifikatu behar baitut nire eginkizuna salatzen ari zaidan iritzi publikoaren aurrean; indarkeria-ezaz baliatzen banaiz, ordea, nire arerioa hesitzen dut hura defentsiban jarraraziz, kasu horretan hark justifikatu behar baitu bere indarkeria iritzi publikoaren aurrean. Horrenbestez, indarkeria-eza oinarri duen kausa bidezko baten aurka eragindako errepresioak justifikazio oro galtzen du. Horrek, jakina, nire arerioaren sinesgarritasuna kolokan jarri eta nire ekintzaren oihartzuna areagotzen du. Eta gainera, nire ekintzek sorrarazitako eztabaida publikoak nabarmen eragingo dio nire borrokak oinarri duen kausari. Epaitegietara eramaten banaute, haiek nire kausaren aldeko tribuna bihurtuz, neronek, akusatu naizen honek, epaituko ditut nire arerioak.

"(...) Indarkeria-ezaren aldeko hautua egiten dudalarik, nik neuk aukeratzen ditut bai armak bai borroka-eremua: borrokarako prest ez egoteko arriskua hartzera behartzen dut nire arerioa horrela. Izan ere, indarkeriaz baliatuko naizela espero du hark, eta eremu horretan borroka egiteko erabat prestaturik dago hura (...) Beraz, guztiz zentzuzkoa da lan-hipotesi honi eustea: zapaltzaileek indarkeriaz baliatzeko duten ahalmena beti da handiagoa zapalduok hartaz baliatzeko duguna baino. Alde horretatik, kontua da zapalduontzat hanka-sartze estrategiko ikaragarria dela justiziaren esparrua uztea indarkeriazko bideei ekiteko, bide horretan zapaltzaileak hebain-hebain eginda utziko baitu zapaldua. Arau nagusitzat hartu behar dugu Saul Alinskyk Ameriketako beltzei buruz esaten zuen hura: "Politikari dagokionez, zentzugabekeria lerdoa baino ez da esatea boterea fusilaren puntan datzala, fusil guztiak gure arerioen esku baitaude".

Amaitu izan ezin zuten "krabelinen iraultza" portugaldar hartan loreak jarri zituzten fusilen ahokoetan orain dela 35 urte, 1974ko apirilean. Baina egokiera hartan ez ziren eskubide guztiak loratu, eta halaxe gogorarazi ziguten Portugaleko antimilitaristek. Hemen ere sarriegitan ikusi behar iza-

ten dugu nola gutxiesten dituzten erakundeek herritarren eskakizunak, edo erakundeetan bertan nola uzten dituzten eskakizun horiek edukiz huts-hutsik. Ohikoak dira, halaber, disidenteak gaizkile bihurtzeko saiakerak. Beraz, hautabide askotarikoen artean aukeratzeko moduko egoeran egongo bagara, behar-beharrezkoa da behetik hasita lanean has gaitezen: bere burua legeen babespean ezkutatuz, inork herritarren nahi eta proposamenak ez ukatzeko egoeran, alegia. Eta hori, noski, gogotik irabazi behar da: jendearen parte-hartzea bultzatu behar dugu, ekinaren ekinez jokatu behar dugu, arerioari eutsi behar diogu, inoren aurrean limurtuz eta argudiatuz.

Indarkeria-eza ez baita pasibotasunaren sinonimoa. Aitzitik, indarkeria-ezak ezinbestean izan behar du aktiboa, pasibotasunetik gehien urruntzen den aukera baita hura. Indarkeria-ezak bere-berez erakusten ditu erdietsi nahi dituen helburuak, bidea bera helburu bihurtzen duelarik. Hortik dator, hain zuzen, gure taldearen izena: Bidea Helburu. Zoritxarrez, ordea, tarte ikaragarria egon ohi da lortu nahi izaten dugunaren eta hura lortzeko urratu ohi dugun bidearen artean; honela dio John Paul Lederachek tarte horri buruz ari delarik: “Ez dakigu nola lotu bilatzen ari garena eta hura bilatzeko darabilgun modua (...) Tarte hori gainditzeko behar-beharrezko zaigu gure helburu eta idealak haiek lortzeko moduarekin estu lotzea (...) Helburuak eta bitartekoak uztartu behar ditugu”.[5] Eta behin eta berriz horretan saiatu, bai horixe!

Halaxe ulertzen dugu guk indarkeria-eza (hitz bakarrean bildurik balego bezala): gure iritziz, bizitzan egoteko modu bat da, arazoei aurre egiteko eta haiek aldarazteko proposamen positibo bat; ez, ordea, indarkeriarik gabeko egoera batera iristeko soilik, gatazken oinarrian dauden injustiziak gainditzeko baizik; halaber, injustizia horiek sortzen duten pasibotasunari eta apatiari aurre egiteko. Horrexegatik diosku Hannah Arendtek desobedientzia zibila politikoki garrantzitsua izango dela, baldin kontzientzia kopuru nabarmen batek bat egin eta haiek guztiak baturik iritzi publiko bihurtzen badira; izan ere, iritzi baten indarra ez datza kontzientzian, haren aldeko pertsona kopuruan baizik.[6]

Argudio horri helduz, hara zer idatzi zuen Mariano Ferrerrek Donostian egin genituen Indarkeria-eza aktiboari buruzko VI. Jardunaldien gainean ari zelarik: “Desobedientzia zibila gizartera hedatzeko, iritzi publikoaren koska gainditu behar dugu; horrek esan nahi du gure arrazoia besterekin konpartitu behar dugula, eta gehiengoari dei egiteko moduan azaldu behar dugula hura;

5 John Paul Lederach: *El abecé de la paz y los conflictos. Educar para la paz*, Catarata, Madril, 2000, 95. or.

6 Antonio Casado: *La desobediencia civil a partir de Thoreau*, Gakoa, Donostia, 2000, 72. or.

gure helburuak kontu handiz hautatu behar ditugula –berehalakoan sustraitutako helburuak, noski; hobe baitira erdibideko helburu erdiesgarriak finalista lortezinak baino–; aurrez aurrekoa eremu sinbolikoan jarri behar dugula, baina jakitun izanik keinuaz haratago joatea ere behar-beharrezkoa dela; testuinguruari erreparatu behar diogula eta, orobat, jokoan dauden indarrei; zer antolamendu klase behar dugun kontuan hartu behar dugula; eta, jakina, irmo eutsi behar diogula lanari".

Hori guztia jakin badakigu, eta orobat dakigu hemen bildu ditugun zenbait ekintza, agian, ez direla sartzen zorrotz indarkeria-ezazko estrategia teoriko batean[7]; ekintza haiek egin zituztenek ere, agian, ez zuten gogoan halakorik[8]. Are gehiago: gerta liteke gu geu aldez edo moldez bat ez etortzea hemen aipatzen ditugun ekintza guztiekin. Dena dela, gure ustez beharrezkoa da den-denak hemen jasotzea. Hala, memoria kolektibo historikoa aberastu nahi izan dugu, "indarkeriarik gabeko ekintzetatik" (holaxe, bereiz idatzirik) "indarkeria-ezazko ekintzetarainoko" (dena batean idatzirik oraingoan, eta indarkeria-ezaren printzipio klasikoen parametroen barruan) urratsa ematea helburu dugularik; izan ere, eraginkorrago irizten diogu azken horri, gure herriko disidentziak eta matxinadak gizatiarragoak eta koherenteagoak izan daitezen.

Balio beza bilduma honek horretarako, irudimena zirikatu eta desobedientzia zibilaren eta indarkeria-eza aktiboaren bidean aurrera egiteko, eta segi dezagun holaxe gizartea aldatzeko prozesuan.

Hara zer irakurri genion orain gutxi Ana Blandiana idazleari: "Justiziak memoriarik egiten ez badu, memoriak egin beharko du justizia (...) Errealitatea hautatu eta era askotara sorberritzeko ahalmena du memoriak". Horratx zer egin nahi izan dugun.

**Bidea Helburu,** 2009ko maiatza.

---

7 (Marratxo batez lotuta idatzirik): "Ez da, inondik ere, burukeria hutsa. Zer edo zer berria esan beharrez sorturiko kontua da hori. Beti esan dugu indarkeria-eza ezin dela definitu indarkeriaren ukazio gisa soilik –are gutxiago, indarkeriaren adierarik arruntena kontuan hartuz gero–; haren bere-berezko ezaugarria baita jardunbiderako programa eraikitzailea izatea, pentsamolde berria izatea, pertsonari eta munduari buruzko ikuskera berria izatea. Hala, bada, indarkeria-eza areago da pasibotasunaren aurkako erronka, indarkeriaren aurka dagoen bitartekoa baino. Horrek guztiak behartzen gaitu kontzeptu hori hitz bakarrean adieraztera, hizkuntzak duen malgutasun sortzaileaz baliaturik; hizkuntza gauza baita, ezbairik gabe, osotasuna adierazteko, zatietako bat adieraziz; edota hitz bati hari dagokion jatorrizko adiera baino zabalago bat emateko; hainbat hitzekin gertatzen dena duzue horren lekuko". (Indarkeria-ezazko Alternatiba baterako Taldea, 1983). Larzacen (Frantzia) eman zuten definizioaren berri izateko, jo helbide honetara: www.larzac.org/documents/definitions/ Notre_definition_de_la_non_violence.php

8 Pere Ortega; Alejandro Pozo: *Noviolencia y transformación social*, Icaria, Bartzelona, 43. or.; bi egile horiek darabiltzaten iturrien arabera (Ackerman, Peter; Christopher Kuregler: *Strategic Nonviolent Conflict*, Praeger, Londres, 1994), indarkeria eza erabiltzen dutenen artetik %85 baizik ez omen dago konprometiturik indarkeria-ezaren printzipioekin.

## Antzinaroa

Diotenez, Historiako lehenengo kontzientzia-eragozlea emakume bat izan zen; hau da: Ediporen alaba eta Polinizeren ahizpa Antigona. Antigonak bere osaba Kreonte tiranoaren esana betetzeari uko egin omen zion, eta bere anaia Eteoklesen gorpuari lur eman; izan ere, ez omen zioten hari hileta-ohorerik eman nahi. Kreontek estatuko arrazoiak lehenetsi behar zirela esan zuen, gaztea auziari ihes eginda hil omen zela-eta; baina Antigonak estatuko arrazoiei bizkarra emanda jokatu zuen.[9]

## III. mendea

294. urtea. Ez zen izan lehenengo kontzientzia-eragozlea, ez eta bakarra ere, baina Maximiliano soldadua intsumisioagatik hiltzera kondenatu zuten; hona hemen epaia: "Diziplinaren aurkako espirituz jokatu duzula ikusirik, eta soldadutza egiteari uko egin diozula, legezko zigorra ezarriko dizugu: ezpataz hiltzera kondenatzen zaitugu". Maximiliano legionarioa zen, haren aitaren moduan, baina kristau bihurtu zenean **berriro armak hartzeari uko egin zion**.[10]

## XIV. mendetik XVIII. mendera bitartean

XIV. mendearen erdialdea. **Ez soldadurik, ez gerrarako dirurik**. Eloko herriak uko egin zion Nafarroako Erresumako gobernadore Luis infantearen tropetarako herrikideak erreklutatzeari, bai eta haren gerra finantzatzeari ere: "Non queriendo yr en el dicto servicio o contribuyr".[11]

1473. "**Foru-pasea**". Araba, Gipuzkoa eta Bizkaiko Aldundiek, eta Nafarroako legeek zuten ahalmena. Haren arabera, Foruen aurka zeuden

9 Henri Fronsac: *Qué es*, 7. or., in *No-violencia y objeción de conciencia*, Fontanella, Bartzelona, 1964.

10 *Ibídem*, 9-10. orr.

11 Josemari Lorenzo Arribas: *Legítima desobediencia. Tres décadas de objeción, insumisión y antimilitarismo del MOC*. Traficantes de Sueños, Madril, 2002ko martxoa, 25. or.

erregе-arauak ezeztatzeko ahalmena onartzen zitzaien. Onartzen da, baina ez da betetzen. 1473an ohikoa zen pasea Gipuzkoan. 1514an “Sobrekarta” izena eman zioten Nafarroan. 1526an, berriz, Bizkaiko Foruaren XI. Legearen I. Titulua onartu zen, eta halaxe azaltzen dute bertan: “Que cualquier carta, o provission real, que el dicho Señor de Vizcaya diere, o mandare dar, o preveer, que sea, o ser pueda, contra las Leyes, e Fueros de Vizcaya, directe o indirecte, que sea obedecida, **y no cumplida**”.

XV. mendea. Lederachen arabera, **“Indarkeria-eza”ren kontzeptua lehenbizikoz** Txekiar Anaiek erabili zuten. Ordena horren sortzailea Petr Chelcicky izan zen, eta ikusmolde bakezale “anarkista” eta kristaua garatu zuen. Indarkeria orori edota gerran parte hartzeari uko egitean datza hura, bai eta botereari eta horri itsatsirik dagoen elizari uko egitean ere.[12]

XVI. mende erdialdea. Kolaborazio-ezari buruzko saiakera aitzindaria. Étienne de La Boétiek (1530-1563) tiraniapean lotzen gaituen morrontzari buruz “Borondatezko morrontzari buruzko diskurtsoa edo Bataren aurkakoa” idatzi zuen, lege-ikasketak egiten ari zela. Liburu horretan egileak galdera zehatz bat azaltzen du: zergatik obeditzen dio gehiengo batek boteretsuari?; honela dio: “Tiranoa gizon bat baino ez bada, eta haren mendeko herritarrak, berriz, asko badira, zergatik onartzen dute azken horiek beren esklabotza?”.[13] Hala, bada, Boétie katoliko libertarioak indarkeriarik gabeko taktikaren alde egin zuen nagusiei desobeditzeko.[14] Ez dago, inolaz ere, tiranizidioaren alde, tiranoa den pertsona hiltzearen alde; haren ustez, **tiranoa “hiltzea” haren boterea suntsitzean baitatza; hau da: haren agintea indarkeriarik gabe ukatzean**. Horrenbestez, pertsona bat hiltzea baino areago, tirania bera hiltzen da.[15]

> “Umilazio horietatik aska zintezkete, horretan saiatu ez arren, **hori nahi izanez gero**. Utziozue, bada, morroi izateari, eta pertsona libreak izango zarete. Ez dut nahi hari aurre egin diezaiozuen, edo dardarazi dezazuen, **baina bai hura sostengatzeari utz diezaiozuen**. Orduan ikusiko duzue tiranoa erortzen eta bakar-bakarrik puskatzen, kolosoa hura eusten duen oinarria kentzen zaionean bezala”.[16]

---

12 John Paul Lederach: Op. cit., 98. or.

13 Ikus hemen: http://www.temakel.com/texolabotie.htm . Saiakera horri buruz ari dela, José Bovék idazten du bere *Por la desobediencia cívica* (El Viejo Topo, 2004) liburuan, hura irakurtzeak “obeditzearen edo desobeditzearen artean hautu pertsonala” egin beharraren aurrean jartzen gaituela. Gehiago ere esaten du: “tirania gutako bakoitzaren baitan dago, gertaera politiko edo pertsonalen arabera mendekotasun-morrontza bihurtzeko beti prest”.

14 http://enciclopedia.us.es/index.php/Pacifismo

15 http://www.temakel.com/texolabotie.htm

16 Étienne de La Boétie: *El discurso de la servidumbre voluntaria*, Tusquets, Bartzelona, 1980.

1575. **Aski da. Doazela militarrak hemendik.** Errebolta Oliten, Priego kapitainaren konpainia militar espainolaren gehiegikerien, laidoen eta konfiskatzeen aurka. Jaso zituzten aginduei jaramon handirik egin gabe, Nafarroako herri horretako herritarrek uko egin zioten beren etxe eta ostatuetan soldaduak gordetzeari, eta orobat beren uzta eta ganaduaz haiei jaten emateari, bai eta haien zaldiak bazkatzeari ere. Protestaldi horren aurrean, udal-zinegotziak atxilotu zituzten, horrenbeste gehiegikeriari aurre egin eta beren herrikideekin konpontxo eginda egoteagatik. Dena dela, sedizio horrek aurrera egin ez zezan, erregeak Gaztelara itzularazi zituen bere tropak.[17]

1631tik 1634ra bitartean. Hiru urtean, Bizkaiko Batzar Nagusiek Felipe IV.a **erregearen aginduak betetzeari uko egin zioten**. Izan ere, Olivaresko konde-dukeak emandako agindu horien arabera, lurraldean zegoen gatz guztia bahitu behar zuen Jaurerriak, gero Erret Haziendaren bidez baizik ez saltzeko; hala, gatza zergapetzea zuen helburu aginduak. Bizkaitarrek uko egin zioten erregeren esana betetzeari, haien iritziz Jaurerria ez zelako Gaztelako zergalegeen mendeko, baina Felipe IV.ak bere tropak bidali eta etxeratze-agindua ezarri zuen, herritarren matxinadari amaiera emateko. 1634ko maiatzaren 24an sei lagun atxilotu zituzten (besteak beste, Batzar Nagusietako idazkari Martin Otxoa Ajorabide), eta gero hilarazi, erreboltaren buruzagi izatea leporatuta.[18]

1639. **Tropa militarrei ostatu emateari uko egin zioten** Tafallako eta Oliteko herritarrek. Irlandako oinezko erregimentuko soldaduak eta haien familiak herriko etxeetan ez hartzea erabaki zuten. Bi herri urbaztertarrei mehatxu egin zieten, agindutakoa bete ezean mila dukat arteko isunak ordaindu beharko zituztela. Alkateak eta herri bakoitzeko bi zinegotzi hiriburura eraman zituzten, preso.[19]

1653. **Erreklutak desertore.** Kataluniaren aurkako gerran aritzeko, agintariek 500 nafar erreklutatzea eskatu zuten. Dena dela, asko kostata lortu zuten erregimentua osatzea; hala ere, Aldundiak berak berehala onartu behar izan zuen porrot egin zutela saiakera guztiek: “hasieratik ohartu ginen gehienek ihesari eman ziotela; beraz, zerbitzuak ez zuen batere eraginik izan”. Hargatik, errekluta berriak eskatu zituzten, baina herriko agintariek ezetz esan zieten. Lorenzo Arribasek honela dio ironiaz: “Kanpaina berrian izena

17 Jose Mari Esparza Zabalegi: *¡Abajo las quintas! La oposición histórica de Navarra al Ejército español*, Txalaparta, Tafalla, 1994, 32. or.

18 Iñaki Egaña: *Quién es quién en la historia del país de los vascos*, Txalaparta, Tafalla, 2005eko maiatza, 439-440. orr. Gainerako hildakoak Morga Saravia, Juan de la Puente Urtusaustegi, Juan de Larabaster eta Juan eta Domingo Bizkaragana senideak izan ziren. Probestu nagusiak eta haren bi eskribauek ihes egitea lortu zuten.

19 Jose Mari Esparza: *Op. cit.*, 49. or.

emanez gero, aurreko urtean desertore izana barkatuko ziela hitz eman zien erregek hurrengo urtean den-denei. Erregeren halako ontasun-erakutsiak hunkiturik, **inortxok ere ez zion jaramonik egin**”.[20]

1673. William Pennen familiarekin erregek zuen zorra ordaindu zietelaeta, ehunen bat ingeles kuakero Iparramerikan jarri ziren bizitzen. Gero Pennsylvania esango zioten lurralde haren kolonizazioa armarik gabe eta hango indioekin hitzarturik egin zuten kuakeroek. Hasieran mesfidati agertu arren, indioek argi ikusi zuten berdin gisa tratatzen zituztela, eta hartu beharreko erabakiek denen onura zutela helburu. Denen artean onartutako erregelamenduak hiru oinarri nagusi zituen: 1. Ez nagusirik ez esklaborik. 2. Gizarte-klaserik ez. 3. Erlijio-borrokarik ez.[21]

1716, 1718 eta 1755. **Desertzioak barra-barra eta herritarren babesa.** XVII. mende osoan gertatu zenaren bidetik, desertzio ugari egon zen garaiotan ere. Hara zer dioen Esparzak: “kontua da desertzioa ez zegoela gaizki ikusia, eta herritarrek, gainera, desertoreak babesten zituzten”. 1716an lege bat egin zuten, babes erabateko horri amaiera emateko; zigor gogorrak ezarri zizkieten “beren etxeetan iheslariak jasotzen edo ezkutatzen dituen orori, edota inork ezagutu ez ditzan, aldatzeko arropak ematen dien orori”. Bi urte geroago, berriz, Nafarroako Diputazioak argi ikusi zuen 1638tik ezarrita zeuden erregimentuetara joateari uko egin zioten desertore kopurua oso handia zela; izan ere, “bertakoen babesa itzelekoa da; denek babestu nahi dute beren askatasuna, eta inork ez du erregimentuetara joan nahi; hala, bada, ihesi alde egiten dute, eta non edo non ezkutatzen dira”. 1755ean, beste araugintza bat onartu zuten, “ene tropetan dagoen desertore kopuru handiari konponbidea emateko”, erregeren hitzetan, eta orobat iheslariei ematen zitzaien babesari amaiera emateko; apaizek, baserritarrek eta emakumeek babesten omen zituzten batez ere; agidanez, “iheslariak ezkutuan gordetzen zituzten, eta arropa ere ematen zieten, toki seguruan ipintzeko”.[22]

1750/03/01. Urruñan, Frantziako Armadako bereiziriko tropa batek tiro egin zien Frantziako Gobernuak tabakoaren gainean ezarritako zergaren aurka protesta egiteko bilduta zeuden emakumeei. Hainbat emakume tiroz

20 Josemari Lorenzo Arribas: *Op. cit*., 25. or.

21 Henri Fronsac: *Op. cit.,* 15-17. or. “Honela dio William Pennek: ‘Ez nire semeek, ez neronek ez dugu sekula tirorik egin; ez dugu sekula ez ezpatarik ez beste ezein armarik erabili’ (...) Penn akordio batera iritsi zen indigenekin, eta lege batzuk ezarri zituzten denen artean: gaur egun Europan indarrean dagoen edozein kode baino liberalagoa zen araugintza pedagogiko halako bat, alegia”.

22 Jose Mari Esparza Zabalegi: *Op. cit*, 76. eta 80. or. Lan honetatik jasoa: A. Crespo, *La Guerra entre Vicuñas y Vascongados*, Juventud, La Paz, Bolivia, 1975, 47. or. Ikus, halaber: Aldaba Taldea, 2000ko apirila.

hil zituzten; besteak beste, Marie Dithurbide, Agustina Irigoity eta Gratianne Suhibar.[23]

1792tik 1794ra bitartean. Austriaren kontra borrokatzeko, **Lapurdi, Zuberoa eta Nafarroa Behereko herritar askok uko egin zioten erreklutatuak izateari**. Hain da sendoa erabakia, Frantziako Armadak indarrez okupatu baitzuen Euskal Herria; euskara "Iraultzaren kontrakotzat eta atzerrikotzat" jo zuten. 1793an, soldaduen erreklutatze erabatekoa dekretuz agindu zuten; horrenbestez, desertzioa 40.000 eta 50.000 gizon artekoa izan zen Frantzia osoan. Nahitaezko erreklutatzetik iheska zihoazenei laguntzen harrapatzen zituzten guztiak hil egin zituzten. Halaxe gertatu zitzaien 23 urteko Manech Etcheverryri eta Taulo Garati, biak ala biak Itsasukoak; 1794ko martxoaren 13an lepoa moztu zieten bi mutilei, herriko 47 gazteri muga pasatzen laguntzea leporatuta. Urte hartan bertan, armadak pot egin zuen Saran, eta horren erantzukizuna herritarrei egotzi zitzaien, "armak hartu nahi ez dituztelako"; hala, bada, ondasun guztiak kendu zizkieten. Gauza bera gertatu zen, halaber, Itsasun, Azkainen eta Lapurdiko beste herri batzuetan. Martxoaren 3an, lau mila lapurtar baino gehiago Landetan deserriratu zituzten; ehunka lagun hil ziren erbestean.[24]

1793 eta 1794. Hainbat emakumek herri-klubak sortu zituzten, Frantziako Iraultzaren ondorioz batez ere, emakumeek politikan parte hartzea bermatu behar zela iritzita. Hala ere, jakobinoek klub horiek ixten zituzten ahal zuten bakoitzean; inolako jardunbide politikotan parte hartzea galarazten zitzaien emakumeei. Gehien nabarmendutako emakumeak, berdin dio zer ideologia politiko zuten, gillotinara kondenatu zituzten, edo erbestera. Gillotinan hilarazi zuten, esate baterako, Olympe Gouges: 1791n **"Emakumearen eta Herritarren eskubideen Adierazpena"** idatzi zuen emakumea, alegia; adierazpen hori "Gizonaren eta Herritarren Eskubideak"[25] haren aurka idatzi zuen, nolabait. 1792an, berriz, Mary Wollstonecraftek **"Emakumearen eskubideen defentsa"** argitaratu zuen AEBen.

23 Iñaki Egaña: *Quién es quién en la historia del país de los vascos*, Txalaparta, Tafalla, 2005eko maiatza, 260. or.

24 Jose Mari Esparza: *Op. cit*., 105-110. or.; eta Iñaki Egaña: *Op. cit*., 180. eta 365. or.

25 Ana De Miguel: http://www.nodo50.org/mujeresred/historia-feminismo2.html

## XIX. mendea

1804. Karlos IV.a Borboiaren tropek Bizkaiko Jaurerria okupatu zuten; horren ondorioz, Batzar Nagusiak geldiarazi zituzten, eta **gerra-egoera** ezarri 1807ra arte. Horren guztiaren helburu nagusia hauxe izan zen: **bizkaitar gazteek soldadutza egin behar izango zutela-eta, herritarren aldetik piztutako matxinada ikaragarria itzaltzen saiatzea**. Halaxe proposatu zion erregearen kontseilari Manuel Godoyk Batzar Nagusietako ordezkari Simón Iza *Zamacola*ri; izan ere, euskal erakundeak Abandoko portua eraikitzea eskatzen zion gobernuari, eta honek, berriz, matxinada bertan behera uzteko eskatu zuen ordain gisa.[26]

1833. Hazparneko herritar gehienek **uko egin zioten beren seme-alabak eskolara bidaltzeari**: "Aitzakia nagusia irakasleak euskararik ez dakiela hizkuntza hori irakasteko".[27] Horrek sutan jarri zituen Frantziako ikuskatzaileak; XIX. mendearen erdialdean, euskara jotzen zuten lurralde osoak pairatzen zituen gaitzen erruduntzat, baita armadan sartzeari uko egitearen erantzuletzat ere. Honela zioen Hazparneko ikuskatzaileak: "Frantsesa ez dakiten gazteek Espainiara edo Ameriketara ihes egiten dute zozketa egin behar izaten denean; hala, **desertoreak eta erreboltariak ikusgarri ugaritzen ari dira**, eta nekazaritzan, berriz, langileak falta zaizkigu".[28]

1837ko apirila. **Oriamenditik Donostia bonbardatzeari uko egin zion**. Joaquín Julian Alzáa koronel-orde karlistak, oñatiarra eta Zuzenbide Erromatarreko irakaslea bera, uko egin zion liberalen mendean zegoen Gipuzkoako hiriburuaren aurka bere kanoiekin tiro egiteko agindua betetzeari. "Gehitxo izan zen Joaquín gizajoarentzat";[29] Halaxe, bere kargutik ordezka zezaten eskatu zuen. Egañak gehitzen duenez, "gerretan sentimendurik ez dago", eta geroxeago, berriz –hala diosku De Guerrak– "gaizkile bat balitz bezala jazarri zuten egun batez Oriamendiko garaile izan genuen buruzagi gizatasunez betetako hura; arrazoia, noski, Donostiako hiria bonbardatzeari uko egitea eta ordezkatua izan zedin eskatzea."[30] Zaldibian atxilotu zuten

26 Iñaki Egaña: *Op. cit*., 272. or.

27 Mikel Zabala Montoya: "Rastreando en los orígenes", in *Ikasi eta irauli: Euskal ikasle mugimenduaren historia*, Txalaparta, Tafalla, 2005. Lan honi egiten zaio aipamena: P. Hourmat: "La enseñanza primaria en el País Vasco (Lapurdi, Benabarra y Zuberoa) según la encuesta de 1833", *in* J.I. Lasa *et alii*: *Sobre la enseñanza primaria en el País Vasco*, Auñamendi, Donostia, 1968, 121-126. or.

28 *Ibídem*, 75. or. Aipamena, berriro ere, lan honi: P. Hourmat: *L'Enseignement primaire dans les Basses-Pyrénées au temps de la Monarchie Constitutionelle*. I.P.S.O, Angelu, 1973, 310-314. or.

29 Iñaki Egaña: "Alzaa, Joaquín Julián", in "Quién es quién en la historia del país de los vascos", *Op. cit*., 38. or.

30 Juan Carlos de Guerra: "Lecciones de Genealogía y Heráldica", 693. eta 694. or. Ikus, halaber: http://www.euskomedia.org/PDFAnlt/congresos/01689714.pdf

koronel-orde karlista, eta epaiketarik gabe hilarazi, Urbistondo jeneral *kristinatarraren* aginduz.

1839. Gipuzkoako Batzar Nagusiak Azpeitian bildu zirelarik, Gipuzkoako buruzagi politiko modura Alcalá jenerala izendatzeari uko egin zioten; izan ere, ordurako indarrean zegoen euskal foruak berretsi arren, honako eranskin hau gehitu zion legeak: “monarkiaren batasun konstituzionalari uko egin gabe”. Espainiako gobernuak Azpeitiko alkate Ignazio Altuna atxilotu zuen, eta 1841ean Batzar Nagusiak desegin zituzten (bai eta Nafarroako Gorteak ere), eta orobat foru-pasea eta aduanak.[31]

1843/09/24. **Soldadu-aldien aurkako matxinadak**. Iruñeko mutikoek protestaldi ozena egin zuten egun horretan soldadutzaren aurka, bai izena ematearen bidez egindakoaren aurka, bai zozketa bidez egindakoaren aurka; Nafarroako hiriburuko Santo Domingo komentuaren elizan bildu ziren. Hain izan zen handia zalaparta, hiru egunen buruan Nafarroa iparraldeko mandatariek bilera egin baitzuten Lizason, Nafarroa osoan nagusi zen egonezina berresteko.[32] Ondorengo urteetan desertzioak eta soldadu-aldien aurkako protestak erruz ugaldu ziren, eta horrek ikaragarri haserrarazi zituen garai hartako militar nahiz buruzagi politikoak; haien asmo nagusia “soldadutzari herritar gehienek dioten ezinikusia herrietatik deserrotzea” izan zen.[33] Dena dela, 1847ko urtarrilean, hainbat matxinada gertatu ziren Nafarroa osoan zehar: lehenengo, Iruñean; hilaren 13an, berriz, Tafallan; 14an, Lizarran; 17an, Garesen. Hala, bada, gertaera horiengatik bilatzen zituzten gazteen zerrenda argitaratu zuten.[34]

1846/07/23. **Henry David Thoureauk uko egin zion kapitazio-zergak ordaintzeari** –halaxe egin zuen 1842az geroztik–[35], bai Mexikoren aurkako gerra salatzeko, bai AEBko esklabotzaren aurka zegoela ozen adierazteko. Hargatik atxilotu zuten eta Concorden espetxeratu, Massachusettsen. Han gau osoa eman zuen; honela utzi zuen idatzirik: “Jendea bidegabeki zigortzen duen gobernu baten mendean dagoenarentzat, pertsona zintzoa bada, egiazko leku bakarra kartzela da”. Gertaera horren ondorioz, **lan aitzindari bat** idatzi zuen: **“Desobedientzia zibila”** izenekoa, alegia. Lan horretan, Thoureauk ukatu egiten du obedientzia ezinbesteko bertute bat denik; hark dioenez, sisteman zerbait gaizki badabil, norbanakoak eskubidea omen du,

31 Joaquín Navarro: “El pase foral”, *Deia* egunkaria, 2005eko uztailaren 22a.

32 José María Esparza Zabalegi: *Op. cit*, 218. or.

33 *Ibídem*, 217. or., Iruñeko Aldizkari Ofiziala, 1843ko urriaren 10a.

34 *Ibídem*, 222. or., Probintziako Aldizkari Ofiziala, 1847ko urtarrilaren 29a.

35 Antonio Casado da Rocha. “Thoreau. Biografía esencial”. Acuarela, Madril, 2005eko urtarrila, 87. or.

eta are betebeharra, hari desobeditu eta haren aurka altxatzeko. Estatuaren aurkakotzat aldarrikatzen da, eta bere ideologiaren zedarri izan zen kontzeptu garrantzitsuetako bat garatu zuen; hau da, gobernuak ez daukala zertan eduki herritarrek hari eman nahi dioten baino botere gehiago.[36] Hona hemen "Desobedientzia zibila" idazkian ikus daitezkeen zenbait ideia:

> "Badira zenbait lege bidegabe askoak: haien alde egin behar ote dugu, alai eta pozik, arazoak konpontzen saiatu beharrean? Ez al genioke uko egin behar hasiera-hasieratik haiek obeditzeari? Gaur egun agintean dagoen gobernuaren mendeko pertsonek gehienetan uste dutenez, komeni da itxoitea, harik eta herritar gehienak lege bidegabeak aldatzeko konbentzitzen ditugun arte. Izan ere, haien iritziz, lege horiei aurre egingo bagenie, sendabidea okerragoa litzateke gaixotasuna bera baino. Baina gobernuaren erruz izan ohi da sendabidea okerragoa gaixotasuna baino; hark bihurtzen baitu kaltegarri erremedioa. Gobernuak zergatik ez ote du asmatzen arazoak aurreikusi eta erreforma bat egiteko modu egokirik? Zergatik ez ote du aintzat hartzen gutxiengo jakintsuak esaten diona?...
>
> "Gutxiengo bat indargabea izan ohi da, gehiengoak dioenera moldatzen ez den arte; are gehiago: gutxiengo ere denik ezin esan. Dena dela, indarrez eragozpenak jartzen dituenean, gutxiengo hori jasangaitz bihurtzen da. Estatuak ez du batere zalantzarik izango, baldin eta gelditzen zaion aukera bakarra gizon-emakume zintzo guztiak espetxean sartzea bada. Estatuak ez baitio sekula uko egingo ez esklabotzari ez gerrari. Baldin mila herritarrek aurtengo bere zergak ordaintzeari uko egingo baliote, hori ez litzateke izango, inondik ere, indarkeriazko ekintza odoltsua; bai, ordea, zerga horiek ordaintzea; izan ere, diru horrek guztiak ahalmen itzela emango lioke estatuari bortxaz jokatu eta errugabeen odola isurtzeko. Horixe da, hain zuzen, iraultza baketsu ororen definizioa, baldin halako iraultzarik posible bada. Jo dezagun –eta niri gertatua kontatzera noa– zerga-biltzaile batek, edota beste ezein funtzionariok honela galdetzen didala: "zer egingo dut orduan?"; hona nire erantzuna: "egiaz zer edo zer egin nahi baduzu, uko egiozu zure lanpostuari". Izan ere, mendekoak inoren morroi izateari uko egitean, eta, orobat, funtzionarioak bere lanpostua uztean, esan liteke iraultzaren bidea oso-osorik urratu dugula…"
>
> "Orain dela urte batzuk, elizaren alde egiteko eskatu zidan estatuak; behartu ninduen, halaber, diru kopuru bat ordaintzera, apaiz baten mantenurako; gure aitak entzuten zituen haren sermoiak, baina nik ez. "Ordaindu", esan zidaten; "bestela, espetxean sartuko zaitugu". Nik, jakina, uko egin nion ordaintzeari. Ez nezakeen uler zergatik ordaindu behar zituen zergak eskolako maisuak, apaiza sostengatzeko, eta ez, aldiz, apaizak, eskolako maisua sostengatzeko (…) Hala ere, honako

36 http://es.wikipedia.org/wiki/Henry_D._Thoreau

adierazpena idatzi nuen, agindutakoari amore emanez: “Jakizue nik, Henry Thoureauk, ez dudala nahi neronek onartu ez dudan gizarte bateko kidetzat har nazazuen”…[37]

1866. **Sufragistak**. Zergak ordaintzeko arbuioa, eserialdiak eta gose-grebak (horren ondorioz, hainbat lagun atxilotu zituzten, eta haietako zenbait lagun, gainera, hil egin ziren); horra hor sufragistek egindako zenbait protestaldi, parte-hartze politikorako eskubidea eskatzeko –eskakizun nagusietako bat, noski, boto eskubidea–. Haien helburua legeak, gizarte-ohiturak eta gizartea bera aldatzea zen. Urte asko pasa behar izan zuten, harik eta **emakumeek gizonen antzera botatu eta berdintasuna lortu ahal izateko**.[38] Europako sufragista-mugimendu indartsu eta erradikalena, jakina denez, Ingalaterrakoa izan zen, nahiz AEBn ere nagusi izan zen mugimendu hori 1848tik aurrera.[39]

1873ko otsaila. Espainiako I. Errepublikak uko egin zion gerran parte hartzeari. Batzar Nagusi errepublikanoek onarturiko lehenengo legegintza-erabakiarekin bat, nahitaezko soldadutza aboliturik geratu zen, eta amnistia eman zieten haren aurkako protestaldi eta manifestazioetan parte hartu zuten pertsona guztiei. Bartzelonan bertan ere –hala diosku Esparzak– Diputazioa haratago joan zen bere erabakian, eta hala, **Armada desegitea erabaki zuen**.[40] Agirrek gogoratzen digunez, Errepublikaren Konstituzioko 6. artikuluak honela dio: “Espainiak uko egiten dio gerrari, politika nazionalerako bitarteko modura”.[41]

1873. Gasteizko Unibertsitate Libreko irakasleek **uko egin zioten** Askatasunaren aldeko Boluntarioak zeritzon **milizian sartzeari**, nahiz eta Gasteizko Udalari horixe bera eskatu zioten, Karlistak zeinen hurbil zeuden ikusita. Zabalaren ustez, ezezko haren arrazoia “irakasleak engaiatzeko udal-ordezkariek erabili zituzten manerak izan ziren”, bai eta “milizia hark bere izenak ustez ageri zuen ezaugarriarekin batere zerikusirik ez izatea” ere.[42] Errepresaliak ere hartu zituzten, noski, eta, beraz, hainbat irakasle kargutik kendu zituzten; besteak beste, errektorea bera ere bota egin zuten; are gehia-

37 http://upasika.com/docs/emerson/Henry%20Thoreau%20-%20Desobediencia%20civil.pdf

38 Ana De Miguel: *Op. cit*.

39 1893an eman zuten botoa emakumeek lehen aldiz Zeelanda Berrian; Australian, berriz, 1901ean; Finlandian, 1906an; Norvegian, 1913an; Danimarkan eta Islandian, 1915ean; Holandan, 1917an; Errusian, Iraultza garaian, 1917an; Erresuma Batuan eta Alemanian, 1918an; Suedian, 1919an; AEBn, 1920an; Irlandan, 1922an; Austrian, Txekoslovakian eta Polonian, 1923an; Espainiako estatuan, Errepublika garaian, 1931n; Italian eta Frantziako estatuan, 1945ean; eta Suitzan, 1971n.

40 Jose Mari Esparza Zabalegi: *Op. cit*, 247. or.

41 Xabier Agirre Aranburu, *in* “En legítima desobediencia”, *Op. cit*, 28. or.

42 Mikel Zabala Montoya: *Op. cit*., in *Universidades fugaces*.

go, unibertsitatea behin behinean itxi zuten –eta gero, berriz, behin betiko–. Horren guztiaren ondorioz, ikasleek eta zenbait kultura-taldek protestaldi ugari egin zituzten; hantxe zebilen, tartean, Manuel Iradier bera ere.

1880. ***Boikot* hitza anglizismo bat dugu; haren jatorria Charles Cunningham Boycott kapitainaren abizenetik dator.** Delako kapitain hori Erneko (Mayoko konderria, Irlanda) konde eta lur-jabe absentistaren lur-sailen administratzailea izan genuen. Lur-sailak hobeto bana zitezen eta nekazarien alokairuek hobera egin zezaten lortzeko "nekazari-gerran" (1870-1890), Irish Land League izenekoak errentamendua jaistea proposatu zuen, baina administratzaileak ez zuen proposamenik onartu, eta geroago Liga hartako kideak lur-sailetik botarazi zituen. Ligako presidente Charles Parnellek iradoki zuenez, indarkeriarik gabeko hautabide bat hartzea behar-beharrezkoa zen, kapitainak amore emango bazuen: **harekin tratu gehiagorik ez egitea. Jornalariek ez zuten gehiago haren etxean zein lur-sailean lanik egin behar, eta dendek ere uko egin behar zioten janaria saltzeari (janaria, beraz, kanpotik ekarri behar izaten zuten); postariak berak ere ezin zion posta eraman**. Hala, bada, uzta biltzeko, Irlandaren iparraldetik 50 langile eraman zituen, eta mila polizia eta soldadu ere bai, nahiz eta jakin bazekiten ez zegoela batere matxinada-arriskurik. Gero eta bakartuago, Boycott berehala ohartu zen haren lanak alferrekoak izan zirela; izan ere, uztaren kostua 10.000 librakoa zen ordurako: berezko balioa baino dezente gehiago, alegia. Hilabete hartan bertan, *The Times* egunkarian lehen aldiz erabili zuten *boycott* terminoa; John O'Malley de Mayok hartu zuen izena, konturatu baitzen esaten errazagoa zela hura partzuerrentzat, *ostrazismo* hitza baino (Michael Davitt, *The Fall of Feudalism in Ireland*). 1880ko abenduaren 1ean, Boycott kapitainak Ingalaterrako Suffolkera ihes egin zuen familiarekin, eta hantxe hil zen 1897an. Terminoa oraindik sortzeke egon arren, hitzak adierazten duen ekintza motak baditu aurrekariak; gutxienez 1830etik. Urte hartan, izan ere, National Negro Convention zeritzonak e**sklaboek egindako produktuak boikotatzera** animatu zituen herritarrak.[43]

1890. Bizkaiko meatze-arroan, **Euskal Herriko lehen greba orokorra** egin zuten.

1892. Kubako independentzia gerra zela-eta, 92 euskal gaztek idatzi bat izenpetu zuten, eta hor adierazi, gerrarako **errekrutatzearen aurka desertzioa** proposatzen zutela.[44]

43 http://es.wikipedia.org/wiki/Boicot

44 Iñaki Egaña: *Diccionario histórico-político de Euskal Herria*, II. Liburukia,Txalaparta, Tafalla, 1996ko abendua, 428. or.

1903. Orduan bertan Bilbon sortu berri zituzten Gaztedi Sozialistetan (JJSS) bazegoen joera antimilitarista askoa; batez ere, haren sustatzaile izan zen gizonak jarraitzen zion joera horri: Tomás Meabek, alegia. Hainbat aldiz atxilotu, espetxeratu eta erbesteratu zuten hura, *La Lucha de Clases* egunkari sozialistan[45] argitaratutako artikuluengatik. Beste zenbait korronte sozialistak, ordea, jarrera horren aurka egin zuten, eta hari legitimitatea ukatu, nahiz eta, egia da, Gaztedi Sozialistek sekula ez zioten uko egin soldadutzara joateari. Tomás Meabek premisa hauek azaldu zituen uztailaren 4an:

> "Gizon-emakume guztion desohore diren institutu militarretan barrena zabaldu gure ideal eskuzabalak. Ez da, ez, utopia bat, adiskide sozialistok, soldaduek greba egitea. Ai, soldaduak bere burua ezagutu baleza! Ez al da, bada, menturaz gizaki tiranizatua? Haren guraso eta senideak ez al dira justiziaren atzetik dabiltzan langile porrokatuak? (…) Gehiago ere esango nizueke; baina neu ere gure despota lizunen mendean nago. Klase kapitalistak gerrak behar ditu; gerrak eta gerrak. Langileek, aldiz, bakearen epaile izan behar dute. Hala lirateke, baldin ideia honi amore emango baliote: sozialismoa bakea da (…) Irakatsi zuen semeei soldadutzara joan baino lehenago. Ez ezazue hau sekula ahantz: gerrari itzuriko bazaio, bide zuzen bakarra soldadua heztea da; hura sozialista bihurtzea, alegia. Hark ez du, inolaz ere, borreroarekin kidetasunik sortu behar, gurekin baizik".[46]

1904. Espainiako gobernua kexu zitzaion, berriz ere, Nafarroako Diputazioari, erreklutatzen zituen tropetan desertore kopurua ikaragarri handia zelako.

1906/09/11. Mohandas K. Gandhik hitzaldi historikoa egin zuen Johannesburgen. Hitzaldi horretan, Gandhik britainiar kolonialismoaren aurkako desobedientzia zibila egin zezan proposatu zion Hego Afrikako komunitate hinduari; hala, bada, poliziaren aginduei ez obeditzeko esan; **nortasun agiririk ez erakusteko**, alegia. Atxilotu eta gero, atzera ere askatu

45 1903ko irailaren 17an eratu zuten JJSS Bilbon; bost egun lehenago, Meabek *Derroteros* izeneko artikulua idatzi zuen, eta han honela dio: "Belgikako Guardia Sozialista Gazteen Federazioaren moduko zerbait sortu behar genuke hemen, gure gazteentzat. Talde horrek, izan ere, Armadaren aurkako kanpaina eraginkorrak egin ohi ditu; hala, bada, jada hainbat soldaduk ez dute hura ohoretzat hartzen, lotsaizuntzat baizik". Aipamena lan honetan aurkitu dugu: Antonio González et Aurelio Martín: "La Lucha de Clases", 461, 1903ko irailaren 12a, in *Apuntes para la Historia de las Juventudes Socialistas de España*, Pablo Iglesias Fundazioa, Madril, 1983, 5. or.

46 Luki de Aldazabal: "Puntos de vista sobre el Servicio de nuestros jóvenes" in *Euzkadi*, 217, 1981eko urtarrilaren 29a, 12. or. Ikus, halaber: Antonio González eta Aurelio Martín: *Op. cit*., 22. or. Era berean, EAJk ere ez zion uko egin soldadutzari, baina 1903ko apirilean hura aukerakoa eta denentzako berdina izatea proposatu zuen: "Alda dezatela gaur egungo nahitaezko soldadutza, eta jar dezatela beste bat haren ordez, aukerakoa eta dirua sari duena; izan bedi soldadu ofizio hori aukeratzen duen herritarra. Dena dela, hura lortzen den arte, izan bedi nahitaezko soldadutza denentzat berdin; ken bitez dirutan ordaindutako pribilegioak; sar bitez armadan aberatsak nahiz pobreak, denak berdin. Bien bitartean, sor bitez lau euskal probintzietan bertako semeek soldadutza egiteko moduko zerbitzuak". Lan honetan aurkitu dugu aipamena: *Euskal gazte mugimenduaren mende batetako ibilbidea*, argitaragabea, 12. or.

zituztenean, berriro ekin zioten borrokari. Bi mila laguneko baino gehiagoko martxa baketsuak Transvaal eta Natal banatzen zituen muga hautsi zuen bost egunez. Martxa hartan parte hartu zuten guztiak atxilotu zituzten. Afrikako meatzeetan lanean ari ziren sei mila hinduk **greba deitu eta atxilotu zitzaten eskatu zuten**: “Espetxearen beldur ez den herritarra estatua bera baino indartsuagoa da”.[47] Azkenean, Hego Afrikako agintariek amore eman behar izan zieten, eta hinduei eskubideak aitortu.

1908. Baionako jostunek Ipar Euskal Herriko lehenengo greba orokor nagusira deitu zuten.

1909. Tuterako irin-fabrikako langileek greba hasi zuten, eta **trenbidea moztu**, Afrikako gerran borrokatzera zihoazen **erreklutei oztopatzen saiatzeko**.[48] Oliverrek kontatzen duenez, Penintsulako hainbat tokitan, zenbait emakume **trenbidean etzan ziren**, erreserbistak Marokoko gerrara eraman zitzatela galarazteko.[49]

1909ko uztaila. Alfontso XIII.ak Marokoko gerrarako ezarri zuen erreklutamenduaren aurkako errebolta. Mitin eta mobilizazio oro jazarri zuen Espainiako armadak. Katalunian, gerraren aurkako greba egitera zihoazenean, greba-batzordeko kideak atxilotu zituzten, eta Ferrer i Guardia pedagogo anarkista fusilatu, Bartzelonako “Aste Tragiko” ezagunaren eragile izatea leporatuta. Ehun mila lagunek protestaldia egin zuten Bartzelonan; Bilbon, berriz, Gaztedi Sozialistetako Acevedo eta Doménech kideak prozesatu zituzten, gaitzespeneko mitin batean parte hartzeagatik.[50]

## XX. mendea

1910eko iraila. Hil baino bi hilabete lehenago, Lev Tolstoi idazle eta pentsalari anarkopazifistak Gandhiri idatzi zion, **“erresistentzia-eza”** kontzeptuari buruz hainbat gogoeta egiteko. Lederachek argitzen duenez, Tolstoirentzat, maitasunean oinarritutako legea eta erresistentzia-eza ez zetzan soilik indarkeria mota orori uko egitean; areago zen hura jabetza pribatuari, Errusiako eliza ortodoxoari eta, oro har, Estatuari berari uko egiteko

47 Henri Fronsac: *Op. cit*., 25. or.

48 Xabier Agirre Aranburu:*Op. cit,* 307. or.

49 Pedro Oliver Olmo: *La utopía insumisa de Pepe Beunza. Una objeción subversiva durante el franquismo*, Virus, Bartzelona, 2002ko otsaila, 18. or. Ikus, halaber: Henri Fronsac: *Op. cit.*, 32. or.

50 Miguel Ángel Molinero: “Notas históricas sobre la UGT” *in* “Tiempo de Historia”, 19, 1976ko ekaina, 9. or. Ikus, halaber: Antonio González eta Aurelio Martón: *Op. cit*., 17. or. Pedagogiaren esparruan horrenbeste berrikuntza ekarri zituen Eskola Modernoaren sortzaile Ferrer i Guardiari buruz, ikus: Joan Senent-Josa: *Ajoblanco*, 53, 1980ko martxoa, 23. or.

modu bat. Tolstoiren ustez, beharrezkoa zen soldadutzari eta herri-zerbitzuari ere uko egitea, bai eta gerraren gaineko zergei ere.[51]

1910eko urria. Frantziako armadako errekluta zelarik, **trenbideetako langileen aurka ekiteko bere erregimentuari eman zizkioten aginduak betetzeari uko egin zion Lous Lecoinek**. Hargatik, sei hilabeteko espetxe-zigorra ezarri zioten. 1912an lizentziatu zutelarik, bakezale eta libertario gisa izandako konpromisoak nabarmendu zuen Lecoin. *Liberté* egunkariaren zuzendari izan zen. Lehen Mundu Gerra piztu zenean, Gerrako Auzitegiak intsumisioagatik eta ordena publikoa aztoratzeagatik 6 urte eta 6 hilabeteko zigorra betetzera kondenatu zuen, 1917an (5 hilabete eman zituen kartzela militar batean). Nicola Sacco eta Bartolomeo Vanzetti hil zituztenean, 1927an, Ameriketako Legioaren Kongresu batean infiltratzea lortu zuen Parisen, eta presidenteak hitza hartu zuenean, aulkitik jaiki eta hiru aldiz oihu egin zuen, esanez: “Gora Sacco eta Vanzetti!”. Atxilotu egin zuten. Bigarren Mundu Gerrarekin bat, “Bakea orain” izeneko lana zabaldu zuen; horren ondorioz, berriro ere espetxeratu egin zuten 1943an. 1958an, Albert Camusekin batera, kontzientzia-eragozleentzako estatutu baten aldeko kanpainari ekin zion.

1910etik 1914ra bitartean. Afrikako gerran parte hartzera joateko, **erreserbistek behin eta berriro uko egin zioten ontziratuak izateari.** Hala, bada, gelditu gabe atxilotu zuten jendea. Tuñón de Larak dioenez, Bizkaiko hiriburuan, Sánchez Barroso kaporala kondenatu zuten, nahiz eta ondoren indultua eman zioten, **antolatu zituzten planto egiteetako batean**, ingeniarien ofizial-orde bat hiltzeagatik.[52]

1914-1918. Ipar Euskal Herriko milaka herritarrek uko egin zioten Lehen Mundu Gerran parte hartzeari.

1914. Kanpaina bateratua Espainiako estatuan: milioi bat **sinadura gerraren aurka**.[53] Fronsacen iritzirako, langileen mobilizazioak “gerran sartzea galarazi zion Espainiako gobernuari”.[54]

1918. **Datuek argi erakusten dute.** Historikoki, Frantziako estatuko gainerako herritarren artean baino arbuio handiagoa agertzen diote nahitaezko soldadutzari euskal herritarrek (1799 eta 1800 artean, %40koa; 1907an, %79koa; eta 1810ean, %28koa); hala, Gobernuko Mugen Ikuskariak 1916an

51 John Paul Lederach: *Op. cit*., 99. or.

52 Tuñón de Lara: *La España del siglo XX*, Laia, 1973, 117. or. Ikus, halaber, Akal argitaletxeak 2000. urtean hiru liburukitan argitaratu zuen lana.

53 Antonio González eta Aurelio Martín: *Op. cit.*, 17, 18 eta 20. or. JJSSren buruzagi izan zen Andrés Saboritek egiten du aipamena bere *Oroitzapenetan*. FPIn dagoen esku-izkribua. Ikus, halaber: Juan A. Herrero-Brasas: *Informe crítico sobre el servicio militar*, Lerna, Bartzelona, 1987.

54 Henri Fronsac: *Op. cit*., 32. or.

eman zituen datuen arabera, Pirinio Behereetan 1.086 desertore zeuden, ez gutxiago ez gehiago (274, soldadutza baino lehen, eta 812, berriz, soldadutzaren ostean), eta 16.889 intsumiso (10.445, mobilizazioa baino lehen, eta 6.444, berriz, ondoren). Horrek argi erakusten digu, Zuberoan, Lapurdin eta Nafarroa Beherean, Lehen Mundu Gerraren aurka agertutako desertoreak "ongi ikusiak zeudela; horrek nabarmen adierazten du, orobat, eskualde honetan badela nazio-sentipen halako bat" –halaxe onartu behar izan zuten Frantziako agintariek–.[55]

1918. **Bertrand Russell** filosofoak **Lehen Mundu Gerraren aurkako indarkeriarik gabeko ekintza batean parte hartu zuen**; sei hilabete eman behar izan zituen preso hargatik. Bi urte lehenago, irakasle postua galdu zuen Cambridgen, eskubide zibilei eta bakeari buruzko bere ideiak zabaltzeagatik. Hainbat urte geroago, arma nuklearrak desagerraraztearen alde borrokatzeari ekin zion. 1967an Nazioarteko Russell Tribunala sortu zuen beste zenbait intelektualekin batera; han zen, tartean, besteak beste, Jean-Paul Sartre. Tribunalaren helburu nagusia hauxe zen: Vietnamgo Gerrako krimenak ikertzea. Txapartegik filosofoaren esaldi ezagun hau gogoratzen du: "Gizakiek gerrarekin akabatzen ez badute, gerrak akabatuko du gizakiokin".[56]

1918. Pierre Ceresolek Nazioarteko Zerbitzu Zibila (SCI) sortu zuen Suitzan, ahalik herrialde gehienetan nahitaezko soldadutza ordezkatzeko.

1919 eta 1920. **Kolaborazio eza Indian.** Garai hartan britainiar inperioaren kolonia zen India, eta haren independentzia lortzeko, **Mohandas K. Gandhi** ospetsuak hainbat metodo batu zituen: *Satyagraha* (egia bilatzea edo hartan irautea), *ahimsa* (minik ez egitea) eta desobedientzia zibila. Urte haietan, Gandhik bere dominak itzuli zizkien ingelesei. Nehruk abokatu izateari utzi zion, eta ehunka legelarik bide berari heldu zioten. Ikasleek unibertsitatera joateari utzi zioten; haien ordez, fundazio indiarrak sortu zituzten, eta haurrak eskola ingelesetatik atera. Lanbide publikoak ere utzi zituzten. Mitinen ostean, arropa ingelesak pilatu zituzten, eta galtzak eta alkandorak erantzi, ia biluzik geratu arte; orduan, Gandhik, irribarrez, pospolo bat hurbildu zien bertakotuei: ziurtagiriak sutara, arropak sutara, dena sutara… Hala, norberak ehundu behar izaten zuen kotoia hari indiarrez, antzinako goru batean. Kongresuaren banderari ere sigla berria ezarri zioten: gorua; *charkha* bat, alegia. Den-denek ekin zioten iruteari. Herriek buruaskitasunaren alde ekitea zuten helburu (geroago, 1934an, Indiako pospoloak egiten hasi ziren, bai eta

55 Jacques Garat: "Insoumission en Iparralde en 1914", Lehen Mundu Gerrari eta Euskal Herriari buruzko unibertsitate-ikerketa baten laburpena, *Enbata* agerkaria, 1991ko azaroa.

56 Ekai Txapartegi. "Desobedientziaz ibiltzen". Txalaparta, Tafalla, 2005, 44. or.

hortzetako orea, erratzak eta beste hainbat gauza ere). Era berean, Galeseko Printzeari boikota egitea erabaki zuen Kongresuak, bai eta, oro har, arropa eta eskola ingelesei ere. Herritarrek ingeles epaitegietara joateari utzi zioten. Domina militar eta zibilak itzuli zituzten haien jabe ziren indiarrek. Horren guztiaren aurrean, ingelesak herritarrak atxilotzen hasi ziren, etengabe: 1921eko abenduan, 20.000 indiar sartu zituzten India osoko kartzeletan.[57]

### *20ko hamarkada*

1920. Silvestre Ciprés atxilotu zuten, **soldaduak beren nagusiei desobeditzera zirikatzeagatik** eta, halaber, haiek Marokoko gerrara eraman behar zituen **trenean ez igotzera** animatzeagatik.[58]

1921. Holandan, **Nazioarteko Gerraren aurkako Erresistentzia-kideen Taldea (WRI)** sortu zuten, hainbat herrialdetan Lehen Mundu Gerraren aurka zeuden bakezaleek sustatuta.[59]

1921eko uda. **Rifeko gerraren aurkako Greba Orokorra**, uztailean milaka soldadu Annualeko kanpamentuan eta Arruit Mendiko kuartelean hil ostean. Komunistek nahiz anarkistek egin zuten grebarako deialdia, baina Eusko Gaztedik ere parte hartu zuen hartan. Armadak ikaragarriro jazarri zituen grebalariak. Astebetez armadak Bilbo eta Bizkaiko meatze-aldea okupatu zituen, eta hildako eta atxilotu ugari eragin manifestarien artean.[60]

1922/09/16. **"Euskal Unibertsitatea nahi dugu"**. Halaxe zioen Jesús de Leizaolak zeraman kartelak, Eusko Ikaskuntzak Gernikan egin zuen Euskal Ikasketen III. Kongresuan; hantxe zen, tartean, Alfontso XIII.a erregea ere. Gernikako kaleetan barna zihoalarik, jende ugari inguratu zitzaion Leizaolari, oihuka, harik eta Poliziak eta Guardia Zibilak "zirikatzaileen" aurka eraso egin zuen arte; kartela hautsi eta hura zeraman gizona atxilotu zuten, bai

57 Catherine Clément: *Gandhi, profeta de la libertad*, Aguilar, Madril, 1991,62. eta 63. or.

58 José Mari Esparza Zabalegi: *Op. cit*. Emilio Majuelok eta Víctor Morenok emandako datuak.

59 Gauza gehiago jakin nahi izanez gero, ikus hemen: http://wri-irg.org/es/index.html Indarkeria-ezari buruzko gida praktiko bat ere badakar webgune horrek.

60 Gertaera horien guztien aurrean, "Ante el dolor. Fiesta de sangre" izeneko artikulua idatzi zuen Eli Gallastegi abertzaleak *Aberri* astekarian. Besteak beste, hauxe dio: "Odol ugari isuri zuten, bero-bero, atzo Bilbon. Betiko moduan, atzokoan ere jende arruntaren odola isuri zuten. Gizon idealistak, beti borrokan eta sufritzen ari diren gizonak izan ziren hildakoak. Komunistei egokitu zaie orain, lehen *Solidaridad* elkartekoei egokitu zitzaien moduan. Gugandik urrun asko daude haiek, baina zer axola dio horrek? Gazte haien bularrak zeharkatu zituzten balak itsatsirik geratu dira gure bihotzetan. Gurea balitz bezala sentitu dugu tragedia hura (...) Herriko Etxean gertatutakoa ikaragarria izan zen; komunismoaren etxean, horratik! Koadroa ezin harrigarriagoa. Eraikina inguraturik zutela, tiro egin zioten, atergabe; fusilak buru zirelarik, hura okupatu eta, barruan, korridoreetan, itzeleko odol-festa egin zuten. Ideal goren bat buruan itsatsirik zeukaten gizonak hil ziren, alajaina! Beste hainbat gizon, berriz, atxilotuta eraman zituzten (...)". Francisco Letamendia "Ortzi": *Historia de Euskadi*, Ruedo Ibérico, 169. or.

eta Ramirez Olano izeneko gizona ere. Bi-biak kartzelara eraman zituzten, lotuta.[61]

### *30eko hamarkada*

1930eko martxoaren 12tik apirilaren 6ra bitartean. Gatzaren aldeko ibilaldia. Gandhi buru zutela, lagun-talde batek 380 kilometro egin zuen oinez, Indiar Ozeanoaren kostaldera iritsi zen arte. Hara iristean, Gandhi Sabarmatin barruratu eta bere eskuez ur gazitua bildu zuen. Hala, gatzaren gaineko zerga bat ordaintzera behartzen eta hura biltzea galarazten zuen monopolioarekin haustera gonbidatu nahi izan zituen Gandhik bere aberkideak. Milaka lagunek jarraitu zioten ekintza horretan Gandhiri, eta hala, gatzaga batean baleude bezala, ontzietan ur gazitua biltzeari ekin zioten. India osoan berdin jokatu zuten, eta erabateko desafio bihurtu zen hura. Britainiarrek milaka "gatz-lapur" atxilotu zituzten. Dena dela, maiatzaren 5ean Gandhi beldurgabeak ibilaldi handi bat antolatu zuen Gobernuaren Dharasanako gatz-depositura, eta han atzera ere atxilotu egin zuten. Hala ere, gatza zaintzen ari ziren Poliziei desafioa egin zieten han bildutako milaka boluntariok, eta gatza biltzen hasi ziren denak. Poliziek, berriz, makilaka erantzun zieten: bi hildako, 300 zauritu eta milaka lagun atxilotu. Gandhik bederatzi hilabete eman behar izan zituen kartzelan. Nolanahi ere, erregeordeak azkenean txangoa galdu eta indiarrei gatza biltzeko eskubidea aitortu behar izan zien.

1931ko apirilaren 4a. **Espainiako II. Errepublika eratu zen, batere tirorik egin gabe**. Data hori baino lehenagoko zein geroagoko hainbat gertaera indarkeriazko gorabehera, Manuel Tuñón de Lara historialariak honela azaltzen du zer-nola eratu zen Espainiako Errepublika:

> "Beraz, zuok guztiok dagoeneko badakizuen moduan, egun-argi berriarekin bat, Errepublika sortu berriak aurpegia erakutsi zuen Eibarren, toyotar eta telleriatar agintari sozialista zenbaiten eskutik. Aldez edo moldez historia bera ere halakoxea delako, agian orduz nahastu zirelako, edota baten bat arinegi ibili zelako; tira, nork daki… Kontua da Errepublika hara iritsia zela, eta Madrilen pixka bat izutu zirela ordurako; puska bat ere bai, beharbada. Hoyosko Markesak, Barne Arazoetako ministroak, Berenguerri hots egin zion telefonoz: 'Zer egin behar dut orain? Bidali hona segurtasun-indarrak!'; eta Berenguerrek erantzun: 'Nik ezin dizut hemendik hara segurtasun indarrik bidali'; goiza ere badoa aurrera; badoa, bai, aurrera apirilaren 14 hartako goiza. Eguerdi hartan bertan Bartzelonan aldarrikatu zuten Errepublika; ezagutuko duzu, noski, denoi horren ezaguna zaigun

61 José Luis Orella: *Universidad Vasca*, Erein, Donostia, 1977, 76. or.

aldarrikapen lauso hura: Companysek lehenengo, Maciák gero; arazo gutxi zituzten, bada, haiek biek! Arratsaldeko hiruetan oso garrantzizkotzat hartu behar dela iruditzen zaidan zerbait gertatu zen Madrilen; garrantzi handikoa, estatuari buruzko analisiari dagokionez, behintzat: Errepublikaren bandera jaso zutela Komunikazioen Jauregian, alegia. Baina, jakina, hura sinbolo bat baino dezente gehiago da; nolabait esateko, estatuaren hedabide-sistema zentralak huts egin duela onartzearen pareko dugu; alegia, erregimenez aldatu nahi zutenek estatuaren ernamuina okupatu zutela, **tirorik egin gabe betiere**; hau da: **indarkeriazko jardunik gabe**. Are gehiago: Madriletik bertatik hasiak zirela gainerako lekuetara telegrafiatzen. Hala, bada, erregimen berria eratua zegoen ordurako, nahiz eta hura lauso samarra izan. (…) Errepublikazale gehienek ez zuten botererik espero, nahiz eta bazen ere beste alderdi bat askoz ere zazpikiagoa, askoz ere ekintzari emanagoa: hor zegoen, adibidez, Miguel Maura bera: boterea kaletik bertatik hartu zutela idatzi zuen gizona, alegia. Hori ere egia da, noski; komeni baita argi ikustea Errepublikaren behin-behineko Gobernua ez zela botereaz jabetu; botere-organoetan kokatu zen, besterik gabe. Izan ere, gauza bat da boterearen jabe izatea, eta beste bat, oso bestelakoa, hartan egotea; tira, hori aspaldiko kontua da, bai, eztabaida askoren iturburua”.[62]

1931ko maiatzaren 27a. **Soldaduek uko egin zioten manifestariei tiro egiteari**. Donostiako bi lekutan gertatu zen, nahiz eta, geroago, Ategorrietan, Guardia Zibilek hirugarren kontrol bat jarri zuten; Pasaiatik familiekin batera manifestazioan atera ziren marinelei tiro egin zien Guardia Zibilak; zazpi lagun hil zituzten, hogeiren bat zauritu eta asko eta asko atxilotu.[63] Sizilia Erregimentuko soldadu-aldiko tropek bitan egin zioten uko ibiltariei tiro egiteari[64]. Honela diosku Pereirak:

“Arrantza-industriaren sindikatuak eta haren adarra zen Pasaiako Itsas Batasunak (…) hileko 300 pezeta eskatzen zuen Grand Solen ari ziren marinelentzat, bai eta igandearen pareko izan zitekeen atseden egun bat ere, eta orobat 15 ordukoa baino gehiagokoa izango ez zen lan-eguna (…) Ontzi-jabeak amarruak prestatzen ari ziren: haien morroiak Galiziako itsas herrietara joan ziren (Porto do Sonera, adibidez), han arrantzale-anaidietan bazkide ziren marinelak hona ekartzeko; dena dela, ez zieten esan hemen haien kide langabetuen lana egin behar zutenik; gainera, arrantzu-tresnak Getariara eraman nahi zituzten (…). Maiatzaren 26an, sindikatuaren zuzendaritzako hainbat kide atxilotu zituzten (besteak beste, Juan Méndez eta Francisco

62 Manuel Tuñón de Lara: “La coyuntura histórica española de 1930-1931”, 46 eta 47. or.

63 Xabier Portugal: *Pasaia 1931-1936. La memoria de los vencidos*, Pasaiako Udala, 2008ko otsaila. Guardia Zibilak tiroz hil zituen hildakoen izen-zerrenda dakar liburuak.

64 Iñaki Egañak, ikerketa batzuk egin ondoren, hildakoen izenak aurkitu zituen: Julián Zurro (19 urte), Jesús Camposolo (23 urte), Manuel Pérez (34 urte), José Novo (25 urte), José Carnés (32 urte), Antonio Barrio (31 urte) eta Manuel López (31 urte).

Cabezón), antza Getariara eramatekotan zeuzkaten zenbait arrantzu-tresna erre zituztelako. Astigarrabia berehala joan zen Donostiara eta Aldasoro gobernadorearekin aritu zen berriketan, atxilotuak kalera atera zitzaten eskatzeko; ez zuten, ordea, ezertxo ere adostu. Hala, militante komunistak indarrez askatuko zituela mehatxu egin omen zion Astigarrabiak. Hurrengo egunean, biharamunarekin bat, mila eta bostehun gizon-emakume –umeak ere baziren tartean– Pasai San Pedron bildu ziren, Villa Brille gobernadore eta jeneralarekin hitz egiteko. Han gehiengoa osatzen zuten galegoei "burugogor" deitu zien gobernadoreak, eta ondoren, berriz, militarra erretiratzean, manifestariek Pasai Antxora alde egin zuten, eta han beste horrenbeste herritar gehitu zitzaien. Manifestazioaren buruan, bi kartel zeuden: haietako batek "gure kideentzako askatasuna" egiten zuen aldarri; besteak, berriz, "gure seme-alabentzako ogia" eskatzen zuen; Herrera eta Donostiako tranbien garaje artean, hainbat tropak errepidea moztu zuten. Dena dela, baionetak ondo lotuta, tropa haien buru zegoen ofiziala ez zen ausartu agintzen, manifestazioaren buruan zihoazen emakumeei eta haurrei tiro egiteko; bien bitartean, berriz, gainerako manifestariek txalo egiten zieten militarrei. Vinagresko Gainean beste pikete bat zegoen, eta han ere gauza bera gertatu zen. Baina garajeetan, Ategorrietako erlojuaren aurrean, Guardia Zibila zegoen. Soldaduek zer-nolako jarrera izan zuten ikusita, emakumeek aurrera segitu zuten, haien asmoetan uste on gehiegi zutela; atzetik, berriz, gizonek eskuak goratuak zituzten, beren jarreren ontasuna erakusteko. Halako batean, ordea, lehenengo turuta hotsak arreta deia jo zuen, eta berehala, tiro jasa ikaragarri baten eztanda aditu zen; haren ondorioz, sei hildako eta hogeita hamar zauritu baino gehiago zeutzan errepidearen erdian etzanda; gainerako jende samaldak ihesi alde egin zuen, izututa".[65]

1931/08/02. Erreferendum baten bidez onartutako Núriako Estatut berriaren atarikoan honela dio: "Kataluniako herriak nahiko luke gazteak soldadutzaren morrontzapetik aske gera daitezela (…) Hala, bada, **gerra oro debekatzen eta kondenatzen dugu gure Konstituzioan** (…) Halaber, adierazten dugu **herritarrei ez zaiela behartuko soldadutza egitera**".[66]

1931/09/17. **Lehenengo gose greba Euskal Herrian.** Larrinagako espetxean egin zuten greba Bilboko Eusko Gaztediko kideek. Gobernuaren agindu baten aurkako protestaldia zen hura; agindu horren arabera, izan ere, atxilotu baten aurka kargurik jarri gabe 72 orduko epe legala igarota ere, hark preso jarrai zezakeen, nahiz eta epaileak haien askatasuna ezarria izan ordurako.

65 Dionisio Pereira: "El Trintxerpe republicano: génesis de la denominada 'quinta provincia gallega' en Euskadi", Itsas Memoria, Itsas Ikerketei buruzko Euskal Herriko Aldizkaria, 5, Untzi Museoa-Museo Naval, Donostia, 2006, 739. or.

66 Javier Fernández: "Ideología, objetivos y estrategia del movimiento de objetores de conciencia en España, Francia e Italia", *A priori 2* aldizkaria, 1, uztaila-urria, 1982, 51. or.

Zenbait preso abertzale batu zitzaien Eli Gallastegiri eta haren kideei; denek ere Corkeko alkate errepublikazale irlandarraren eredua zuten buruan –hil arte barau egin zuen hark–. Espetxearen inguruetan jende ugari bildu zen, grebalariei babesa emateko. Kartzelako zuzendariak dimisioa eman zuen eta azkenean, bi egun geroago, presoak aske utzi zituzten, Madriletik iritsitako aginduak hala agintzen baitzuen.[67]

1934. Posta zerbitzuko pilotu zibil batek, Quirados J. Gou izenekoak, **uko egin zion** Asturiasen matxinatutako langileen aurkako **bonbardaketan parte hartzeari**; hargatik, zigortu egin zuten.[68]

1936/07/18. **II. Errepublikaren kontrako altxaldi militarra.** Francisco Francoren eta Emilio Mola jeneralaren altxaldiak hasieratik izan zuen arrakasta Araban zein Nafarroan. Araban borroka armaturik eta guda-oinik egon ez baziren ere, probintzia horretan hildakoak 350 inguru izan ziren; Nafarroan, berriz, 3.000 lagun inguru fusilatu zituzten, epaiz kanpo betiere. Hildako horiei guztiei hilabete batzuk geroago Bizkaian eta Gipuzkoan izandako "garbiketak" eta fusilamentuak gehitu behar zaizkie. Guztira, 5.820 pertsona hil zituzten, edo desagerrarazi, edota ehortzi, bide ertzetan. Asko izan ziren, halaber, kartzeletan hilda bukatu zutenak. Beren etxeetara itzuli ezinik urruti hil ziren errefuxiatuen kopurua ere itzelekoa izan zen: 60.000 lagun ingurukoa, hain zuzen. Beste asko, berriz, Espainia frankistari emanak izan ziren. Horri guztiari gehitu behar zaio, noski, bortxatu eta umiliatu zituzten emakumeak, umezurtzak, "garaituen" ondasunen lapurretak: lur-sailak, baserriak, animaliak, etxea, eta abar. Alderdi politikoei, sindikatuei eta hedabideei bahitutako egoitzak, artxiboak eta materialak ere ez ziren gutxi izan; haien jardunaren aurka egindako jazarpen ikaragarria, ezbairik gabe. Deserritutako pertsonak, edo beren herrietatik indarrez kanporatutakoak, lanbidea galdu zutenak, zigortutako ehunka maisu-maistra, atxiloketa arbitrarioak, isunak, batailoi berezietan egin beharreko gatibu-lanak; horiek guztiak eta gehiago eragin zituen matxinada hark.

---

67 Iñigo Camino eta Luis de Guezala: J*uventud y nacionalismo vasco*, Sabino Arana Fundazioa, Bilbo, 1991, 118. eta 156. or. Egileek honako erreportaje honen berri ematen dute: Abasolo J: "La primera huelga de hambre vasca", *Deia* egunkaria, 1982ko otsailaren 21a. Gose-greba egin zuten Eusko Gaztediko kideak honako hauek izan ziren: Arturo de Altuna (administratzailea), Elías de Gallastegi (presidentea), José de Izarzelaya, Miguel de Garai, Agustín Aginaga, Eustaquio F. de Zabala, Pío de Maidagan, Rafael de Agirre, Liberato O. de Zarate, Salvador Jordan de Zarate, Justo Barrutia, Lucas Bilbao, Gregorio S. de Azkona eta Matai de Maidagan. Haiei gehitu zitzaizkien preso abertzaleak, berriz, hauek izan ziren: Aurelio Chico, Justo Mugida, Esteban de Elegezabal, Vicente Cañada eta José de Aranegi. Ordutik gaur egunera arte gose-greba ugari egin dira espetxe barruan nahiz kanpoan. Irlandarren kasuan bezalaxe, hemen ere beren eskubideen alde ziharduten hainbat grebalari hil dira; hala, aipa dezagun, kasurako, 1981eko ekainaren 19an Herrera de la Manchan hildako Juan José Crespo Galende bizkaitarra. Madrilgo Gregorio Marañón Ospitalean hil zen, jan gabe 175 egun egon eta gero.

68 Xabier Agirre Aranburu: *Op. cit*., 30. or.

1937/08/18. **Armada frankistaren Aragoiko 17. Erregimentuan sartzeari uko egiteagatik,** 19 urteko Antonio Gargallo Mejía Jehovaren testigua fusilatu zuten Huescako Jaka herrian.[69]

### *40ko hamarkada*

1941. 1940ko apirilean hasita, **Alemanen okupazioaren aurkako erresistentzia zibilari ekin zitzaion Danimarkan.** Armada alemanak erabateko jazarpena hasi zuen, daniar erakundeak baztertuz. Industrian, eragozpen-ekintzak egin zituzten, eta lan-uzteak. Jendeak SDU siglak ipini zituen papar hegaletan; danierazko "bota ditzagun hemendik" esapidearen haste-letrak, alegia. Bi milioi lagun baino gehiago parke eta kaleetara irten ziren igande batez, daniar kantu tipikoak abesteko. Okupatzaileei "bizkarra ematea" erabaki zuten, bai eta leku publiko batean soldadu alemanak sartzean bertatik ateratzea ere, eta orobat Alemaniaren aldeko albistegia eman arte zinematan ez sartzea. 1941eko azaroan, gobernuak *AntiKomiterm* ituna sinatu zuenean, Kopenhagen matxinada piztu zen, eta erresistentziazko garai latzena bizi izan zuten: sabotajeak, grebak eta kaleetan manifestazio jendetsuak. 1943. urteko abuztuan Alemaniak ultimatum bat eman zion gobernuari, guda-legea aldarrikatzeko eskatuz; gobernua desegin zuten eta aurrerantzean klandestinitatean jardun behar izan zuen gobernua eratu zuten Danimarkako zazpi alderdietako kideek. Bi motatako erresistentzia-ekintzak tartekatu zituzten: batetik, indarkeriarik gabekoak (jardun sinbolikoak eta grebak nagusiki); bestetik, berriz, sabotajeak fabriketan. Bi erresistentzia-ekintza mota horiek ohiko jardunbideak izan ziren 1943. urtetik 1944. urtera bitartean. Ekintza horietako bat mugarri izatera heldu zen: armen eta hegazkinen fabrika bat erabiltezin bihurtu baitzuten orduko hartan, bai eta trenbidea bera ere, ekialdean gerrarako elementu oinarrizkoa Hitlerrentzat (tropak Norvegiatik garraiatzeko). Nabarmentzekoa izan zen, halaber, daniar juduak salbatzeko, herrietan antolaturiko kolaborazio-eza eta oztopatze-jarduna. Izan ere, juduei ezkutalekua ematen zitzaien, edota Suediara iristen laguntzen. Erregeak berak Daviden izarra ipini ohi zuen kotxez paseatzera irteten zenean. Horren guztiaren ondorioz, juduen %5 baizik ez zuten atxilotu ahal izan alemanek.[70]

1942. Norvegiako milaren bat irakaslek eta maisuk uko egin zioten nazien aldeko Quisling gobernuaren zuzentarauei men egiteari. Erresistentziarako, berriz, **kolaborazio-eza eta barau publikoak** proposatu zituzten.

69 http://eu.wikipedia.org/wiki/Intsumisioa

70 Insumissia: "Situaciones históricas de resistencia noviolenta, de COA-MOC", AUPA proiektua, Zaragoza, 1989. http://www.antimilitaristas.org/spip.php?article1779

1943. **Biderik ez badago, egigun guk bidea.** Frankismoak hertsiki debekatu zuen euskararen irakaskuntza; dena dela, Elvira Zipitriak Donostiako bere etxean euskaraz irakastea erabaki zuen. Antzeko ekimenak erruz ugaritu ziren, pixkanaka. 1951n, Faustina Carrilekin batera, bi gela hartu zituen Alde Zaharrean (Mari Etxean, alegia) Zipitriak; gero Orixe ikastola izango zenaren hazia izan zen hura. Hogei haur inguru zituzten ikasle. Urte hartan bertan, Maria Dolores Goyak eta Elixabete Maiztegik beste ikastola bat ireki zuten Gros auzoan (Carquizano kalean). Gauza bera egin zuten beste zenbait andereñok hainbat herritan eta hainbat ikastetxe erlijiosotan: Bilboko Iralaberrin, adibidez, San Nikolasen eta frantziskotarretan. Era berean, gero eta familia gehiago arriskatu ziren indarrean zegoen hezkuntza-legedia gainditzen zituzten guneak martxan jartzera; horrek, halaber, ikaragarri ahuldu zuen eskola haien jarduna, nabarmen hedatu baitzen haien publizitatea. Lokal horietako batzuk gobernuaren aginduz itxi zituzten. Iralaberriren kasuan, berriz, 1959ko azaroaren 10ean bi andereño eta komentuko administratzailea atxilotu eta isundu zituzten[71], katixima euskaraz irakasteagatik. 1963ko abenduaren 26an, Zipitriak erabaki hura hartu eta hogei urtera, orduz kanpo euskaraz eskolak ematen zituen lehen hezkuntzako ikastetxe pribatu bat itxi zuten Elorrion. 1968ko martxoaren 3an, berriz, beste ikastola bat itxi zuten Markinan, gobernadore zibilak hala aginduta. Hurrengo urtean, ikastolak legez onartu zituzten, Gipuzkoako Ikastolen Federazioaren bermearekin. Era berean, Anuntxi Aranak zehaztu duenez, Seaskaren sorrerak izan zuen intsumisiozko eduki halako bat, nahiz eta, beharbada, gehiegitxo den esatea hura desobedientziazko ekintza bat izan zela; izan ere, ekimen hark bide autonomo bati ekin zion Ipar Euskal Herrian, agintean zirauten bi zutabe nagusiei aurre eginez: batetik, estatu jakobinoari, eta bestetik, berriz, elizari.

1944/08/10. Bigarren Mundu Gerran, lau seme-alaba zituen Daniel Argote maisu baionarra atxilotu zuten Orthezen, eta berehala exekutatu, **erresistentzian ari zelarik, alemaniar armadan indarrez sarrarazi zituzten 70 poloniarri desertatzen laguntzeagatik**. 34 urte zituen. Gaur egun, haren izena daramate Baionako eskola eta kale banak.[72]

1947/05/01. Nahiz eta 1946tik greba egiteko hainbat deialdi egin zituzten, egun horietantxe egin zen **frankismo garaiko euskal langileen lehenengo greba jendetsua**. Hainbat enpresak bat egin zuten deialdiarekin, eta nabarmentzekoa da Bizkaiko ibai-aldeko 20.000 langilek egindako mobilizazioa.

71 Katekesia ematea galarazi zieten; baina, horretaz gain, Carmen Gangoiti eta Estibalitz López andereñoei 10.000na pezetako isuna jarri zieten; Severina Mardaras eta Rosario Alberdi andereñoei, berriz, 5.000na pezetako isuna jarri zieten; eta eskola hartako administratzaile Sabin Zubiriri 25.000 pezetako isuna jarri zioten.

72 Iñaki Egaña: “Quién es quién en la historia del país de los vascos”, *Op. cit*., 62. or.

Erresistentziako Euskal Kontseiluak egin zuen deialdia, eta CNTk, UGTk eta ELAk babesa agertu zioten. Armadak Bilbo hartu zuen indarrez, eta Gobernu Zibilak milaka zigor eta erbesteratze ezarri zituen. Langile asko eta asko bota zituzten kalera, baina grebak sei egun gehiagoz iraun zuen.

1948. **Giza Eskubideen Nazioarteko Adierazpena euskaldun batek idatzi zuen**. 1946. urtetik 1958. urtera bitartean Nazio Batuetako frantziar ordezkaritzako kide René Cassinek Giza Eskubideen Nazioarteko Adierazpena idazteko enkargua jaso zuen. 1887an jaio zen Baionan, eta Parisen hil 1976an. Unesco sortu zutenetako bat ere izan zen Cassin, eta 1959tik Giza Eskubideen Tribunaleko kide egin zuten; 1966an, Tribunaleko presidente izendatu zuten.[73]

### *50eko hamarkada*

1952. Aldo Capitinik Italiako lehenengo **Indarkeria-ezari buruzko Zentroa** sortu zuen. Aldo Capitini Gandhiren jarraitzailea zen, antifaxista, katoliko polemikoa, barazkijalea eta idazlea. 1961ean, “herrien arteko anaidiaren eta bakearen aldeko ibilaldia” antolatu zuen Perugiatik Asisera bitartean; han **jaso zuten lehenengoz bakearen bandera** (ostertza, bertan *Pace* hitza agertzen dela). 1964an bakearen aldeko indarkeriarik gabeko mugimendua sortu zuen, eta orobat “Indarkeriarik gabeko Ekintza” hilabetekaria.

1952. Indarkeria-ezaren ekintzaile Danilo Dolci ingeniariak **hiru barau publiko** egin zituen Italian. Trappeton, eskualde pobrea eta Gobernuak erabat utzita zuena, **greba bati ekin zion, baina alderantziz: urtegi bat egitea erabaki zuen, bai eta kaleak konpontzea ere, agintarien baimenik gabe**. **“Botere bikoitzeko sareak”** kontzeptua asmatu zuen. Hirugarren baraualdia Lanza del Vastorekin egin zuen. Dolci atxilotu eta epaitu egin zuten 1956an, baina jende askoren babesa izan zuen.[74]

1954-1962. Aljeriako Independentzia Gerrak iraun zuen bitartean, **desertzioak** nagusi izan ziren. *Jeune Resistence* eta *Indarkeriarik Gabeko Ekintza*

73 http://solidaridad.universia.es/informacion/nobelcassin.htm . Bestetik, http://www.america.gov/st/hr-spanish/2008/November/20081205143802pii0.1874964.html webgunean irakur daitekeenez, Pariseko Epaitegian hasi zuen bere ibilbide juridikoa René Cassinek. Gero, Lehen Mundu Gerran parte hartzeko erreklutatu zuten, eta han, 1916an, beso bat, saihetsak eta sabela larriki zauritu zizkioten. Bi urte geroago, Gerra Beterano Elbarrien Frantziako Federazioa sortu zuen. Gauzei begiratzeko modua erabat aldatu zion gerrak Cassini: “Gerra horrek seinale bizi ezin ahaztuzkoa utzi zuen nigan, bai eta nire garaikideak izan ziren beste askorengan ere”. Lege kontuetan aditu handia izatera iritsi zen, eta halaxe aitortu zioten bere garaian; bere zirriborroetan idatzirik zituen hainbat eta hainbat pasarte baliatu zituzten geroago, Giza Eskubideen Adierazpen Unibertsalean: “Gizaki guztiek bizitzeko eskubidea zutela onartu genuen, bai eta gizartean erabateko askatasunez parte hartzekoa ere; baina haren parean jarri genituen lan egiteko eskubidea eta beste zenbait eskubide ekonomiko, sozial eta kultural”.

74 Henri Fronsac: *Op. cit*., 34. or.

*Zibikoa*[75] mugimenduek babestu egin zituzten den-denak. Gerra hartan 103 euskal soldadu hil ziren.[76]

1955/12/01. Alabamako Montgomeryn, Rosa Parksek uko egin zion zurientzako jarleku batetik jaiki eta autobuseko atzealdera joateari. Aztoramendua leporatuta, berehala atxilotu zuten. Haren adorea eredu zutela, hainbat lagunek eskubide zibilen aldeko mugimenduak abiarazi zituzten. Egun gutxi batzuetan, Montgomeryko herritar beltzek boikot ia erabatekoa egin zieten autobusei. Horrenbestez, urte batean Montgomeryko garraiobide publikoetan segregazioarekin bukatu zuten, eta askoz ere herritar antolaketa handiagoa lortu.

> "Beti esan dute jarlekutik altxa ez banintzen nekatuta nengoelako izan zela, baina hori ez da egia. Lanean egun osoan eman eta gero, egun hartan ez nengoen beste edozeinetan baino nekatuago. Ez nengoen zahartua, hori ere jende askok uste duen arren; 42 urteko emakumea nintzen garai hartan. Ez, gertatzen dena da nekatuta nengoela **amore eman eta amore emateaz**".[77]

Baina gauzak ez dira beti guk nahi bezain ondo ateratzen. Rosa Parks bera saiatua zegoen 1943an aurre egiten, eta uko egin zion lehen ere atzealdeko jarlekuetan esertzeari, baina txofer zuriak autobusetik bota zuen. Hala ere, herritar beltzek tinko eutsi zioten orduko hartan, nahiz eta gauza asko zeuzkaten haien kontra: hilabete askotan lanera oinez joan beharra, KKKren indarkeria (antolatzaileen etxe-bizitzak erretzen baitzituzten), errepresalia ekonomiko eta juridikoak… Borroka gogorraren ostean, 1956ko abenduaren 20an, boikota hasi eta ia urtebete pasea zegoela, autobusak herritar guztiek erabiltzeko moduan ipini behar izan zituzten agintariek.[78]

1958. Urte horretan hasiera eman zitzaion Erresuma Batuan *Campaign for Nuclear Disarmament* izeneko ekimenari.

1958/04/04. Gerald Holtom kontzientzia-eragozleak **bakearen kodea diseinatu zuen** (hain ezaguna bihurtu den "egizu maitasuna, ez gerra", ale-

75 Indarkeriarik gabeko Herritarren Ekinbidearen sortzailea dugu Joseph Pyronnet. Haren ereduaren bitartez, argi ikus daiteke zer egin behar den eta nola. Izan ere, aldarrikapen hutsa ez da sekula aski izaten, hura "gertaera bat ez bada, behintzat. Eta, jakina, aldarrikapen hori konponbide bat ez bada ere, gutxienez konpontze-bidean jarriko gaituen bitartekoa izango da". Hala, indarkeriaz baliatzen ez den pertsona "konprometitu eta bere gain hartzen ditu arriskua eta mina, haren askatasuna kolokan jartzen baita. Irrigarri geratzeko izuak –sarri askotan horixe baita izurik handiena– ez du, inondik ere, gerarazten" (Henri Fronsac: *Op. cit*.,90-95. or.). 1965ean, honako liburu hau argitaratu zuen Joseph Pyronnetek: *L'action non-violente. Une nouvelle force de frappe*, Témoignage Chrétien.

76 Iñaki Egaña: *Op. cit*., 428. or. Muskildiko Jean Sallaberremborderen heriotza aipatzen du egile horrek.

77 *"My Life"* (Ene bizialdia). Rosa Parksen autobiografia.

78 http://revcom.us/a/021/la-memoria-rosa-parks-s.htm

gia), semaforo-kodetik abiatuta; kode hori, batez ere, gerrako itsas armadak erabili izan du, bandera bat mugiaraziz.

### *60ko hamarkada*

1960/10/01. **Haragi-bola ikaragarri handia, Pierre Boisgontier-ekin**. Marilène Clémentek honela kontatzen du Indarkeria-ezazko Herritarren Ekintza taldeko kideen jardun egoki bezain atsegin hau:[79]

> “Geltokiko nasa bat, gauez. Zenbait lagun Pariserako trenaren zain daude. Briven gaude. Sei lagun ezkutuan-ezkutuan daude lur-azpiko pasabidean. 24 urteko gazte batek eta lau poliziak osaturiko talde txiki bat zaintzen ari dira isil-isilik. Mutilaren izena Pierre Boisgontier da. Erizain paraxutista da; armada utzi du, Aljeriako zerbitzu zibil batean boluntario izateko. Armadarentzat, ordea, desertorea da, eta horregatik atxilotu dute.
>
> Briveko poliziek goiz hartan bertan atxilotu zuten Terrasonen, Indarkeria-ezazko Herritarren Ekintzak irekitako lan-eremuan; lan-eremu horretan hainbat iheslarik berriki gertatutako uholdeetako biktimei laguntzen diete, beste gazte batzuekin batera. Hura komisariara eramatea ez da erraza izan. Haren sei kidek lagundu dute, eta mutil bat atxilotzekotan joandako poliziak zazpi mutilekin itzuli dira. Zazpi Pierre Boisgontier, bakar baten partez; izan ere, **sei haietako bakoitzak, nork bere izena esateari uko eginez, Pierre Boisgontier izena dutela esan dute**. Zergatik? Herritarren Ekintza taldeko lan-eremuetan parte hartzen duten kideek elkartasunez jokatu nahi izan dutelako erizain ohiarekin.
>
> Komisarian daudela, Boisgontierri esku-burdinak jarri eta, galdeketa hutsal baten ostean, desertorearen sei kideak botatzen dituzte; haien artean dago, tartean, Joseph Pyronnet.
>
> Gauerdia pasatxo dela, trena badatorrela diote. Hiru minuturen buruan, trena iritsi da. Une horretantxe jauzi egiten dute sei boluntarioek Pier Bisgontier eta haren lau zaintzaileen gainera. Zaintzaileak, kosta lain kosta, aurrera egiten saiatzen dira, gazte desertorea bagoira sartzeko. Isekak aditzen dira, kolpeak handik eta hemendik; segurtasun indarrek argi dute beren egitekoarekin beteko dutela, zernahi gertatzen dela ere…
>
> Dena dela, poliziak giza lokarri hori hausten saiatzen dira, Pierre Boisgontierren inguruan, estu-estu, elkarri loturik dauden sei gorputzek osatzen duten masak oztopaturik eta geldiarazirik. **Bigarrenaren bila doazelarik, hark bat egin du berriro bere kideekin**. Indarkeria-ezazko ekintzaileek, noski, ez darabilte, inondik ere, basakeriarik. Jasotzen duten jipoirik ez dute itzultzen. Poliziek, ezertarako gauza ez

79 Marilène Clément: “¿Cómo se practica?”, 48-54. or.: “No-violencia y objeción de conciencia”, *Op. cit*.

> direla, laguntzeko eskatzen diete nasan dauden bidaiariei. Zibilak dira gehienak, baina badaude militarrak ere. Inork ez du ezertxo ere egiten, salbu eta poliziei batzen zaien ofizial bat. Trena ez da oraindik irten. Pixka bat berandutzen bada, lau poliziek izango dute aukerarik nahi dutena lortzeko; izan ere, gutxiago diren arren, kolpeetan abantaila argi askoa dute.
>
> Indarkeria-ezazko ekintzaileetako batek oreka galarazten dio Pier Bisgontierri, eta lurrera erortzen da. Une horretan, berriz, haren kideek gainera egiten diote jauzi, eta haragi-bola ikaragarri handia osatzen dute; poliziek ostikoz jotzen diote bolari… Haietako bat laguntza bilatzera doa. Bitartean, trena hasia da mugitzen. Zazpi Pierre Bisgontier haientzat garaipen itzela. Eta Briveko polizia guztiak berehala heldu ziren arren, alper-alperrik da; trena abiatua da dagoeneko. Irribarretsu eta pozik, ekintzaileek eskuak erakusten dizkiete poliziei, esku-burdinak jar diezazkieten. Poliziek ez dute egundo ikusi horrelako ikuskizunik. Gauez, denak doaz, isil-isilik, komisariara".

1960ko apirila. Arkako Komunitateko hogeita hamarren bat kide Aljeriako Thol-eko zigor-eremura iristen saiatu ziren. Pont D'Ain-eko poliziek aurre egin zieten, eta haien erantzuna, berriz, garbia: **arrazoi politikoengatik atxilotu nahi dituzten anai-arreba arabiarren patuan parte hartzeko, beren borondatez hara joan nahi dute**. Poliziak, orduan, kamioi batean sartarazi eta herritik atera zituzten. Baina itzuli egin ziren. Haietako batzuk atxilotu egin zituzten, eta askatzean berriro itzuli ziren. Atzera ere kamioian sartu eta lekutik 80 km.ra eraman zituzten. Dena dela, "beren mantetan bildurik, biharamunean komisariako patioan aurkitu zituzten. Nola bota haiek?" galdetzen zuten agintariek.[80] Erantzun aurretik, hala ere, Arkako Komunitateko kideak Parisera Joan ziren, eta han manifestazio isil batean parte hartu gauero Frantziako Barne Arazoetako Ministerioaren aurrean eta Pariseko Vincennesko espetxearen aurrean. Hilak 30ean, Vincennes-ko gotorlekura hurbiltzen saiatzea erabaki zuten, Thol-en egin zuten huraxe bera egiteko asmoz, baina oraingoan mila pertsona inguruz lagundurik egiten dute. Hara iristean, poliziek pankartak eta kartelak konfiskatu zizkieten, eta aurrera jarraitzea galarazi. Orduan, manifestariak lurrean eseri ziren. Jende gehiago batu zitzaien. Hala ere, Poliziak beren furgonetak ekarri eta bi orduz ia denak han sartu zituzten, 3. barrutiko auzapezgora preso eramateko.[81]

1960tik 1967ra bitartean. **Pazkoaldiko Martxak**. Lehenengo "Ostermarsch Bewegung"era deitu zuten Alemaniaren iparraldean, demokrazia eta desarmea eskatzeko, Errepublikaren gero eta militartze handiagoa nabarmenaraziz.

---

80 Henri Fronsac: *Op. cit*., 100. or.

81 Marilène Clément: *Op. cit*., 54-58. or.

Horri guztiari gerrei egindako kritika gehitu zitzaion; zehazki, Vietnamgo Gerrari egindakoa. 1982 eta 1983 artean Pazkoaldiko beste martxa batzuk egin zituzten, AEBk Alemaniako Errepublika Federalean **zituen hornikuntza militarrak blokeatzeko bideei buruz hausnartzeko**.

60ko hamarkada eta 70eko hamarkadako lehen erdialdea. **Bertsolariak off-ean**. Zentsurak 1937tik aurrera euskal kulturaren inguruko edozein adierazpen zigortzen zuela egia den arren, [82] bertsolariak ahal ziren moduan moldatzen ziren frankismoaren trabei eta zentsurei aurre egiteko. Jon Azpillagak kontatzen duenez, **agintariek bertsotan egitea galarazten zietenean –berari, zehazki, seitan galarazi zioten–, ez zituzten ekitaldiak bertan behera uzten; antzeztokira igotzen ziren, eta erregistro-liburuan beste izen batez sinatzen zuten**. [83] Are gehiago: zentsoreek, antza, gero kantatu behar zituzten bertsoak idatziz emateko eskatzen omen zieten. Nolabait esateko, hemendik ordubetera esan behar duzuna esadazu orain, pentsatzen duzun hori esaten utziko dizudan ikus dezadan.[84] Balendin Enbeita bertsolariari birritan esetsi zioten, eta kartzelan ere sartu zuten, preso.

1961. Peter Benensonek sustaturik, hasiera hartan *Appeal for Amnesty* izena jarri zioten; 1962an, berriz, gaur egungo izena jarri zioten behin-betiko: *Amnesty International*. AI munduko 160 herrialdetan dago, tokian tokiko 5.300 taldetan banaturik; **giza eskubideak jazartzen dituzten gobernuei gutuna idazten diete eta hango parte-hartzaileak mobilizatu egiten dira**, dela heriotza-zigorraren aurka, torturaren aurka, etorkinen eskubideen zapalkuntzaren aurka edota emakumeen aurkako indarkeriaren aurka. Kontzientziako presoaren figura ere babesten dute. Londresko idazkaritza arduratzen da euskal gaiez. Gaur egun, 3.000 txosten inguru argitaratzen ditu. 1976 baino lehen elkartze-askatasunik egon ez zen arren, 1974-1975. urteetatik izan badira AIko tokian tokiko zenbait talde. Data horretan Baionako AI taldea sortu zuten.

1962/06/01. 74 urteko Louis Lecoinek gose-greba bati ekin zion Parisen, eragozleei estatus berezia aitor ziezaieten eskatzeko. Ospitalean, ia koman, haren alaba eta zenbait lagun barauldian parte hartzen ari zirela, 22 egun igaro baino lehen grebari amaiera eman zion, Gobernuak hitz eman baitzuen eragozleak askatuko zituela. Frantziako gobernuak Eragozpenari buruzko Legea onartu zuen 1963ko abenduan.[85]

82 http://www.bertsozale.com/castellano/bertsolaritza/oholtzara1.htm

83 Jon Azpillaga, Euskadi Irratian egindako elkarrizketa, 2009ko urtarrilaren 1.

84 http://www.bertsozale.com/castellano/bertsolaritza/oholtzara1.htm

85 Javier Fernández: *Op. cit*., 71. or. Ikus, halaber: Marilène Clément: *Op. cit*., 69-73. or.

1963/04/16. Bereizkeriaren aurkako indarkeria-ezazko protestaldi bategatik, **Martin Luther King Jr. Doktorea** Birminghamgo (Alabama, AEB) espetxean sartu zuten. Honako hau idatzi zuen han zegoela:

> “Beste zenbait egoeratan bezala, gure itxaropenari huts egin zitzaion, eta halako etsipen-sentipen batek hartu gintuen erabat. Ekintza zuzenean jarduteko beharraz konturatzea beste irtenbiderik ez genuen izan; hala, izan ere, gure gorputzak erabiliko genituzke herriko eta nazioko komunitateko kontzientziei gure kasua azaltzeko…
>
> “Galdetuko duzue: Zergatik ekintza zuzena? Zergatik *sit-ins*ak, ibilaldiak eta gainerako kontu horiek guztiak? Ez al da, bada, negoziazioa biderik onena? Arrazoi duzue zuen buruak negoziazioaren alde agertuz. Ekintza zuzenak, hain zuzen, huraxe du helburu. Indarkeria-ezazko ekintza zuzenak halako krisi eta tentsioa sortu nahi ditu, negoziatzeari uko egin izan dion komunitate batek, arazoaz jabetu, eta hari aurre egitera behartuta ikus dadin. Arazoa dramatizatzea da helburua, hura ez ezagutzea inondik ere posible izan ez dadin. Bitxia iruditukoa zaizue agian, indarkeriarik gabeko erresistenteari dagokion lanaren parte den aldetik, ni tentsio-egoera baten alde egotea. Dena dela, aitor dizuet ez diodala batere beldurrik ‘tentsio’ hitzari. Ez diot sekula utzi indarkeriazko tentsio-egoerei aurre egiteari, baina bada tentsio mota bat indarkeria-ezazkoa eta onuragarria dena, pertsona bezala hazteko beharrezko ere gertatzen dena. Gogoan hartu, Sokratesek berak uste zuenez, beharrezkoa dela buruari tentsio halako bat eragitea, norbanakoek mitoekiko eta egia erdiekiko beren mendetasuna gaindituz analisi sortzailearen eta ebaluazio objektiboaren eremu librean sartzeko; era berean, ulertu beharra daukagu ezinbestekoak direla indarkeriarik ez darabilten ‘zirikatzaileak’, gizartean tentsio sortzailea eragiteko akuilutzat erabili eta pertsonek aurreiritziaren eta arrazakeriaren sakonune ilunak utz ditzaten, ulerkuntzaren eta anaitasunaren goratasun maiestatikoa erdietsiz…
>
> “Adiskideok: esan behar dizuet eskubide zibilei dagokienez, tanto bakar bat ere ez dugula sekula egin indarkeria-ezazkoa izan ez den lege-presio setatsurik gabe. Zoritxarrez, talde pribilejiodunek oso gutxitan egiten diotela uko beren pribilegioei gertaera historiko ezin ukatuzkoa da. (…) Jakin badakigu, esperientzia mingarri askoak halaxe erakutsi baitigu, zapaltzaileak ez duela sekula bere borondatez askatasunik aitortzen. Zapalduak eskatu behar dio hura, irmo eta tinko (…) Horregatik, hain zuzen, ez diot ene herriari hau esan: “Uztazue zuen pozik eza”. Aitzitik, saiatu naiz adierazten pozik ez normal bezain osasungarri hori bidera daitekeela indarkeria-ezazko ekintza zuzenaren bide sortzaileari urrats emanez. Eta gaur egun, ez dute, bada, esaten jarrera horri buruz muturrekoa dela… Dena dela, muturrekoa izate horrek hasiera batean kolokan jarri baninduen ere, kontu horri buruz

pentsatzen nuen heinean, ezarri zidaten izen horrek gero eta poz handiagoa ematen zidan. Ez al zen, bada, Jesus bera maitasunaren muturrekoa izan? Beraz, arazoa ez datza muturrekoa izan behar ote dugun jakitean, zer motatako estremistak izan behar dugun jakitean baizik. Gure estremismoa gorrotorantz ala maitasunerantz bideratuko ditugu? Estremismoa bidegabekeriaren zerbitzura ipiniko dugu ala justizia hedatzearen mesedetan baliatuko dugu?”...[86]

1963/05/17. Baionako Aberriaren alde Hildakoen monumentua **margotzen du** Front de Libération Basque erakundeak. “Aux bayonnais morts pour la Patrie” esakunaren ordez, “Aux bayonnais morts pour des prunes” (alferrik hildako baionatarrei) idatzi zuten.[87]

1963/08/28. **Martxa Washingtonen**. Lan-munduan, erlijioan eta eskubide zibilen alde zebiltzan organizazio-talde batek deitu zuen martxa; goiburua, berriz, hau: “lana, justizia eta bakea”. 2.000 autobus, 21 tren berezi, 10 hegazkin eta konta ezin ahala auto heldu ziren Washingtonera; liderrak kongresukideekin batzartuta zeuden, eta haien harridurarako, jendeak haiek gabe hasi zuen martxa, Washington presidenteari eskainitako Monumentutik Lincoln presidenteari eskainitako monumenturaino. Han, mailetatik egindako azken hitzaldietan, Floyd McKissick-ek James Farmer-en idatzi bat irakurri zuen, hura Luisianako protestaldi batean atxilotu baitzuten; Farmer-ek idatzi zuenez, protestaldiak ez ziren eten behar, “harik eta zakurrek Hegoaldean kosk egiteari utzi arte eta arratoiek Iparraldean kosk egiteari utzi arte”. Bob Dylanek *Only a Pawn in Their Game* abestu zuen, besteak beste, **Medgar Evers** eskubide zibilen aldeko aktibista ekainaren 12an nola hil zuten kontatzen duena[88]; abesti horrek, halaber, Mississippiko justizia-sisteman eta, oro har, AEBko Hegoaldean bereizkeria zenbateraino zegoen sustraitua kontatzen du; izan ere, Evers-en hiltzaileak denbora luzez jarraitu zuen aske.[89] Dena dela, egokiera hartan entzun ahal izan zen mezurik gogoangarriena Martin Luther King-ek irakurri zuena izan zen: “**Amets bat daukat**… Egun batean, herrialde honetako edozein beltz bere-berezko balioengatik epaituko dute, ez haren larruazal-koloreagatik”...[90]

86 http://convocatoriamundialirak.blogspot.com/2006/12/carta-desde-la-carcel-martin-luther.html

87 “Euskal Herria y la Libertad”, I. Liburukia, Txalaparta, Tafalla, 1993, 218. or.

88 Medgar Eversek 37 urte zituen seme-alaben eta emaztearen aurrean tiro egin ziotenean. AEBko hegoaldean berdintasun-eskubideen alde borrokan jardun zuen ekintzaile afroamerikarra zen. Bere herrikideen aurkako indarkeriazko ekintzak ikertu zituen, eta **segregazioa babesten zuten dendarien aurkako boikotak antolatu**; lan eskerga egin zuen Mississippiko Unibertsitate segregazionistak James Meredith onartu eta haren eskubide zibilak onar zitzan.

89 http://es.wikipedia.org/wiki/Marcha_sobre_Washington

90 http://es.wikipedia.org/wiki/Yo_tengo_un_sue%C3%B1o http://es.wikipedia.org/wiki/Martin_Luther_King

1963/09/02. Andoaingo Guardia Zibilaren **kuartela ikurrinaz papereztatuta** agertu zen.[91]

1964/04/20. Donostiako Udaleko lau zinegotzik uko egin zioten Francok ezarritako “bakezko 25 urteak” oroitzeko antolatutako *Te Deum*era joateari. Gipuzkoako gobernadore zibilak hamarna mila pezetako isuna jarri zien.[92]

1964ko urria. Lehenengo matxinada Berkeleyko Unibertsitatean. *Free Speech Movement* oihuari erantzunez, **Unibertsitatea okupatu zuten**; eta *Vietnam Day Committee* oihuari erantzunez, berriz, milaka lagunek bakearen aldeko martxari ekin zioten, eta **gazteak armadan errekrutatzeko txartelak hautsi edo erre zituzten**. Gazte ikasleen indarkeria-eza eta errebeldia, gerraren mitologiari eta demokrazia formalari aurre eginez; autogestioa, uniformetasunaren eta debekuen aurrean. 800 sheriffek ehunak atxiloketa egin zituzten, nahiz eta ordena ezartzea ez zuten lortu. 1966ko abenduan, bigarren matxinada Berkeleyn. Ia erabatekoa izan zen eskolara joateari uztea. **Unibertsitate barruan errekrutatze-bulego bat jartzeari arbuio egin zioten**. Erresistentzia pasiboa eta indarkeria-eza autoritarismoaren, arraza-bereizkeriaren eta Vietnamgo gerraren aurrean. Ez zuten helduen gizartean parte hartu nahi. Zenbait artistak, intelektualek eta irakaslek ituna egin zuten ikasleekin.[93]

1965. César Chávezek eta UFW sindikatuak bost urtez egin zuten greba AEBn, eta **nazio osoan boikota egin zieten Kaliforniako mahats-ekoizleei**, harik eta sasoikako mahats-biltzaileentzat hitzarmen hobea lortu zuten arte. Chávezek babes handia lortu zuen herrialde osoan, eta mahats-ekoizleak UFWrekin negoziatzera behartu zituen.[94]

1965eko otsaila. Lorenzo Milani (1923-1967) Barbiana Eskolako apaizak (kontraeskola pedagogikoa)[95] **Italiako antimilitarismoaren klasiko**

91 “Euskal Herria y la libertad” I. Liburukia, *Op. cit*., 218. or.

92 *Ibídem*, 220. or.

93 Furio Colombo: *Alternativa a la violencia*, Lumen, Bartzelona, 1968, 10, 11, 44 eta 45. or.

94 http://www.antimilitaristas.org/spip.php?article1779: Chávezek greba jendetsu batera deitu zituen langileak, baina jauntxoek diru premian zeuden hainbat langile aurkitu zituzten; hala, bada, mahastietako lana zeharo ziurtatuta zegoen. Hori ikusirik, mahatsaren salerosketa boikotatzea erabaki zuten, eta AEBko hiri nagusietako denden aurrean piketeak jartzea, herritarrei greba haren arrazoiak azaltzeko. Gandhi eta Luther King izan ziren mugimendu honen inspirazio-iturri nagusiak. Grebalariek indarkeria bortitza pairatu behar izan zuten. Dena dela, Ingalaterrara bidalitako zama boikotatu zuten zamaketari ingelesek, langile txikanoei elkartasuna adierazteko. Bost urte baino gehiago iraun zuen protestaldi haren ostean, lurjabeek akordio duin bat sinatu zuten nekazariekin. Esan gabe doa, noski, grebalariak indarkeriaz baliatzekotan ibili zirela hainbat alditan –aurrean zituztenen indarkeriari erantzuteko, jakina–; baina Chávezek 25 eguneko barauldi bati ekin zion, haren kideek indarkeria-ezaren printzipioei tinko euts ziezaieten.

95 1967ko *Carta a una Maestra* izeneko liburua eskola-porrotaren aurkako aldarrikapena da, bai eta heziketa askatzaile eta kalitateko baten aldeko adierazpena ere. Gutun nagusiak hemen irakur daitezke: *Dar la palabra a los pobres. Cartas de Lorenzo Milani*, Acción Cultural Cristiana, Madril. Helbide honetan, berriz, testu osoa irakur daiteke: http://www.redescristianas.net/2008/11/23/carta-a-los-capellanes-castrenseslorenzo-milani/

**bat** idatzi zuen Florentzian: **“Kapilau militarrei gutuna”** zeritzona, alegia. Izan ere, Kapilauek “maitasunaren manamendu kristauarekin zerikusirik” gabekotzat jo zuten kontzientzia-eragozpena (1972. urtera arte legeari men ez egitearen eta desertzioaren parekotzat jotzen zuten hura), bai eta “doilortasun adierazpentzat” ere. Milanik bere gutunaren mila kopia inprimatu zituen, eta gero Alderdi Komunistaren *Rinascita* egunkarian argitaratu zuten. Horrek istilu ikaragarriak ekarri zituen, bai eta kanpaina oldarkor askoa ere hedabideetan; Milaniri mehatxu egin zioten *a divinis* apaizgoa kenduko ziotela (1958an, Inkisizioak liburu-dendetatik erretiratu zion *Artzain baten esperientziak* liburua); horrez gainera, salaketa bat ere jarri zuten Milaniren eta astekariaren zuzendari Luca Pavoliniren aurka (Milani 44 urte zituela hil zen; hau da, zigorra bete baino lehenago. Pavolini, aldiz, 5 hilabete eta 10 eguneko zigorra betetzera kondenatu zuten). Auzipetu egin behar zutela ikusi zuelarik, Milanik bere buruaren alde idatzi zuen *Epaileei idatzitako gutuna* ezaguna. Honela esaten die kapilau militarrei:

> “(...) Zuek eskubidea baduzue mundua italiarrak direnen eta atzerritarrak direnen artean banatzeko, orduan nik diotsuet nik ez daukadala aberririk –zuek diozuen zentzuan, behintzat, ez–; halaber, adierazi nahi dizuet eskubide osoa daukadala nik ere mundua honela banatzeko: batetik, behartsu eta zapalduak; bestetik, berriz, abantailatsu eta zapaltzaileak. Lehenengo haiek dira nire aberria; bigarrenak, ordea, nire atzerria. Eta zuek, Kuriak ezertxo ere eskatu ez dizuen arren, eskubidea baldin baduzue irakasteko, italiarrak zein atzerritarrak elkar txikitu daitezkeela modu zilegi eta are heroikoan, orduan nik ere eskubidea daukat esateko behartsuek ere aurre egin behar dietela aberatsei. Eta bitartekoei dagokienez, zuek baino hobea naiz: zuek hobesten dituzuen armak, izan ere, hiltzeko, txikitzeko, suntsitzeko, umezurtzak zein alargunak egiteko makina izugarriak dira.
>
> “(…) **52. artikulua**: ‘Herritar guztien betebehar sakratua da Aberriaren alde egitea…’ Neurri hori bera ezar diezaiegun mende osoan italiar herria sartuta ibili den gerra guztiei. Ikusiko bagenu gure armadaren historia gainerakoen aberrien aurkako laidoek ehuntzen dutela, argitu egin beharko diguzue kasu horietan soldaduek obeditu egin behar ote zuten, edo, aitzitik, beren kontzientziak ez ote zituen eragoztera bultzatu behar. Eta gero, berriz, azaldu behar zenigukete nork egin zuen gehien Aberriaren alde, nork gehien haren ohorearen alde: kontzientzia-eragozleek ala obeditu zutelarik gure aberria gorrotagarri bihurtu zutenek mundu zibilizatuaren aurrean. Aski da dagoeneko, utz itzazue diskurtso hantuste eta orokor horiek. Izan praktikoak. Esaguzue zehatz-mehatz zer irakatsi diezuen soldaduei. Obedientzia, kosta ahala kosta? Eta zibilen aurka bonbardatzea

balitz agindua, edota armarik ez duen herri baten aurkako errepresalia, edota partisanoen hiltze guztiz sumarioa, edota arma atomiko, bakteriologiko edo kimikoak erabiltzea, edota tortura, edota bahituak hiltzea, edota susmo soilek bultzaturik epai-instrukzio sumarioak egitea, edota garbiketa fisikoak eragitea (aberriaren soldadu bat ausaz hautatu eta hura fusilatzea gainerako soldaduei izua eragiteko), edota guztiz oldarkorra den gerra batean parte hartzea, edota herri subiranoak militar matxinoren baten agindua bete behar izatea, edota herritarren manifestazioei indarrez jazartzea? (...)

"**1936an** berrogeita hamar mila italiar soldaduk eraso batean parte hartu beharrean ikusi zituzten beren buruak berriz ere: Espainiako herritar zorigabeei eraso egitera "boluntario" joateko errekrutatzegutuna jaso zuten. Legezko gobernuaren eta herri subiranoaren aurka matxinada piztuarazi zuen jeneral traidoreari laguntzera joan ziren azkar. Italiarren laguntzaren bidez, eta milioi eta erdi hildako eraginda, aberatsek nahi zutena lortu zuen jeneral hark: soldatak blokeatzea, baina ez prezioak, greba, sindikatuak, alderdi politikoak eta zernahi askatasun zibil eta erlijioso ezeztatzea. Gaur egun ere, mundu osoari desafio eginez, jeneral matxino hark garai batean aberriaren alde egin eta gaur egun hura salbatu nahi duen edonor espetxeratzen, torturatzen eta hiltzen (are garrote ematen) du. "Boluntario" italiarren laguntzarik gabe ez zen sekula halakorik gertatuko. Bestaldean ere italiarrik izan ez balitz, espainiarrei ezingo genieke egun tristeotan aurpegira begiratu ere egingo. Zehazki esateko, azken horiek italiar matxino eta deserrituak ziren. Kontzientzia-eragozleak, alegia. Esan al diezue zuen soldaduei zer egin behar luketen Francoren moduko jeneralik tokatuko balitzaie? Esan al diezue herri subiranoari desobeditzen dioten jeneralei ez zaiela obeditu behar?

"**1939tik aurrera**, berriz, desastre hutsa izan zen: italiar soldaduek sei aberriri eraso egin zieten (Albaniari, Frantziari, Greziari, Egiptori, Jugoslaviari eta Errusiari). Esan gabe doa, noski, haiek ez zutela Italiaren aurka batere erasorik egin.

"(…) Gero, berriz, Jainkoari eskerrak, gure aberriak abiarazi zuen gerra bidegabea galdu zuen. Gure aberriak erasotako aberriek gure soldaduak botatzea lortu zuten. Jakina, errespetatu egin behar ditugu. Obedientzia militarrak erasotzaile bihurturiko langile eta nekazari dohakabeak baizik ez baitziren. Kapilauok handiesten duzuen obedientzia militar hori, San Pedroren hitzoi lotuko dizueten ezertxo ere gabe: 'Nori obeditu beha zaio, gizonei ala Jainkoari?' Bitartean, baina, San Pedrok egin zuen moduan jokatzeagatik espetxean bukatzen duten adoretsu apurtxoei iseka egiten diezue (...)".

1965/10/15. Bakioko Ander Manterola apaizari motoa bahitu zioten **isun bat ordaintzeari uko egiteagatik**. Frankismo bete-betean, Madrilen epaitu eta atxilotu zuten beste apaiz bati laguntzeko dirua biltzeagatik ezarri

zioten isuna. **Bizkaiko apaiz talde bat motorzale-kaskoa jarrita duela joan zen** bahiketari segitu zitzaion enkantera, **motoa berreskuratzeko asmoarekin**.

1966. **Frenos Iruña**. Sarien eta denboraren arteko bat ez etortzeak zirela-eta, enpresa horretako langileek lan-uzte partzialak egin zituzten, eta hargatik kalera bota zituzten. 800 pertsona inguruk manifestazioa egin zuten Iruñeko Erakunde Sindikalaren aurrean, eta isil-isilik eta espaloian barrena Gobernu Zibileraino Joan ziren. **Garai berri bateko lehenengo arazoa izan zen hura**: Nafarroako beste enpresetako langileei **elkartasuna eskatu, eta haiek elkartasunez jokatu zuten garaia**, alegia.[96]

1966ko maiatza. Gaztedi Langile Katolikoen (JOC) *Juventud Obrera* aldizkarian argitaratutako **soldadutzari buruzko artikulu batek** zentsura frankista sutan jarri zuen. Prentsaren zuzendari nagusiak 40.000 ale suntsitzea agindu zuen Espainiako estatu osoan.

1966/06/04. Espainiako armadak Arakako lurraldeak nahitaez desjabetu zituen Gasteizen, eta negozio borobila egin zuten Arabako agintari mirabeei esker.[97] Defentsa Ministerioak 7 milioi metro koadro lurralde kendu zizkien Miñaoko, Erretanako eta Gamarra Nagusiko herritarrei. Horren aurrean, herritarrek **protesta egin eta desjabetzeen aurkako idatzi bana bidali zuten**, Erreklutentzako Ikastegia (CIR) egin ez zezaten:

> “Ezin liteke legedia gutxietsi besterenak diren lurraldeak okupatuz eta haiek erabat aldatuz, Nahitaezko Desjabetzearen Legeak ezarritakorik bete gabe. Traktoreak gure lurretan sartu dira, haiek altxatu eta lautu ditu, ezein legek babestu gabeko egiazko okupazio bat eginez (…) Gauza bat da tropei irakasteko lurrok baliatzea, eta beste bat, oso desberdina, hura indarrez hartzea; izan ere, inork ez die jaramonik egin guztiz naturaltzat jotzen ditugun protestei, eta lurren itxura erabat aldatu dute, bai eta haien betekizuna ere, Kanpamentua han jartzeko, bertako herritarren probetxu naturalari uko eginez”.

1966/09/15. Frankismoak eliza baliatzen zuela-eta, harekin kolaboratzeari uko egin zioten. Gamizko erretore José Luis Jauregik **uko egin zion meza emateari, eliza barruan espainiar agintariek zeramaten bandera kentzen ez zuten bitartean**. 1967ko arazoan Ordena Publikoaren Tribunalaren (TOP)

96 José Vicente Iriarte Areso: *Movimiento obrero en Navarra*, Nafarroako Gobernua, 1995, 62. eta 66. or.

97 Proportzio honetan ordaindu zuten azkenean lur-sailen desjabetzea: Gasteizko Udalak 19 milioi pezeta (%53); Foru Aldundiak 5 milioi pezeta; eta militarrek gainerako bostena, beste 5 milioi pezeta, alegia. Gasteizkoak Taldeak eskatu zuenez, etorkizunean gune hura berreskuratuko bazen, uko egin behar omen zitzaion hura militarrek erosi ahal izateari, haiek “armak, gerrak eta heriotza bera” baizik ez baitute finantzatu nahi izaten; lur-saila, aldiz, herritarrena beste inorena ez omen da. (Gasteizkoak Taldea: *Araka y Desamparadas, expolios militares*, José Toribio Barbaren argitalpen-proiektua, 2007, 62-88. or.).

esku jarri zuten berriro, sermoi bat zela tarteko. Data hartan bertan, Juan Mari Arregi Azpeitiak **uko egin zion meza emateari, José Antonio Primo de Riveraren heriotzaren urteurrena ospatzeko**. 1968ko uztailean Jesús Arrue Erkoreka eta Ángel Rementeria apaizak zigortu zituzten, biek ala biek **uko egin baitzioten herri-lan batzuk bedeinkatzeari** eta "agintariei agertutako begirunerik ezagatik". Hilabete berean Agustin Idoyaga Arriaga atxilotu zuten, arrazoi beragatik.[98]

1966/12/21. Etxebarriko Laminaciones de Bandas. **Diktaduraren aurkako grebarik luzeena, batuena, gogoangarriena eta politikoena** izan zen. 163 egun iraun zuen; e**gunero egiten zituzten bilerak, egunero banatzen orri informatiboak, egunero egiten mobilizazioak eta eskualdeko lan-uzteak, diru- eta sinadura-bilketak**… Erabateko elkartasuna agertu zitzaien kaleratutako 564 langileei. 1967ko apirilean, 30 lagun atxilotu zituzten Bilbon egin zuten protestaldi batean. Atxilotuei elkartasuna adierazteko, apirilaren 22an langileek grebara deitu zuten, eta ikasleek, berriz, geldialdi batera.

1967ko apirila. Bilboko Justizia Jauregiaren aurrean 77 apaizek **martxa eta elkarretaratze isila** egin zuten, Euskal Herriko egoera larriagatik protestatzeko. 1968ko martxoan, beste apaiz-talde batek Bilboko gotzain-etxea hartu zuen, eta gero itxialdi bat egin zuten Derioko Apaiztegian; hantxe eman zuten ezagutzera Gogor taldea.

1967/11/24. 600 apaizek baino gehiagok **estatuak ordaintzen zien dirusariari uko egiten ziotela** adierazi zuten.

1968. **Vietnamgo oihanetara eraman behar zituzten errekruten zerrendak erre zituzten napalmez.** AEBko Catonsvilleko aparkalekuan egin zuten ekintza bederatzi lagunek; besteak beste, han ziren Berrigan anaiak. Konspiratzea eta gobernuaren jabetza bat suntsitzea leporatuta, zozketa militarreko agiriak erretzeagatik 16 hilabeteko kartzela-zigorra ezarri zieten. FBIren zuzendariak etsai pertsonal bihurtu zituen Berrigan anaiak.[99]

1968/01/15. Hainbat lagunek **uko egin zioten gobernuak ezarritako isunak ordaintzeari**; horren ondorioz, jende askok espetxean bukatu zuen. Esate baterako, Basauriko espetxean preso zeuden berrogei lagun, ia denak Bermeokoak, askatu zituzten egun horietan. Nabarmentzeko modukoa da, halaber, Sestaoko hainbat bizilaguni j**arritako isuna, alkatearen debekuari men egin gabe txistua jo zutela-eta**; horren aurka, protestazko manifesta-

98 "Euskal Herria y la Libertad", II. Liburukia, 217-234. or.

99 Felipe Cuna, *El Mundo* egunkaria, 2002ko abenduaren 8, 4. or. Philip Berriganen eskela.

zio handi bat egin zuten.[100] Errepresioak jazarritakoen aldeko sermoiengatik zigortutako apaizek sarri askotan egin zioten uko isunak ordaintzeari.[101]

1968ko udaberria. Donostiako Artzain Onaren katedralean nahiz Jesuiten Elizan hainbat **itxialdi** egin zituzten, askatasun falta salatzeko; poliziak haietan esku hartu eta ugari-ugariak izan ohi ziren atxiloketak.

1968/10/20. **Gonzalo Arias**ek indarkeria-ezaren ikusmoldetik paraturiko lehenengo protestaldiari ekin zion, Espainiako estatuan lehenbiziko aldiz; **bularraldean zein bizkarrean estatu-buruzagitzarako hauteskundeak eskari zituen kartela zeramala, kalean barna paseatu zen**. Auzitegi frankistek "Estatuaren oinarrizko legeen aurkako delitu" kontsideratu zuten haren ekintza, eta zazpi hilabeteko kartzela-zigorra ezarri zioten.[102] Kartzelatik irten zenean, atzera ere hauteskunde libreak eskatzeko manifestazioa antolatu zuen, eta berriro atxilotu zuten, baina orduko hartan psikiatrikora eraman zuten. Aske geratu zenean, eragozleekin batera hasi zen borroka egiten, eta berriz ere espetxean sartu zuten, Carabanchelen.

1969. Hainbat lagun –Joseph Mulligan, besteak beste– **Vietnamgo gerrarako errekrutatze-bulegoetan sartu ziren** Chicagon. **Ahal izan zuten bezainbeste txosten eta agiri hartu, kalera irten, eta han su eman zieten den-denei**. Gero ihesi alde egin beharrean, suhiltzaileak eta polizia noiz etorriko ziren zain geratu ziren. Bi urte eta erdi eman zuten kartzelan, baina, hala ere, nahitaezko errekrutamendua sei hilabetez gerarazi behar izan zuten.[103]

1969/01/19. **Gastronomia-elkarteek eta konpainiek boikota egin zioten Danborradari**. Donostiako Konstituzio Plaza hutsik agertu zen San Sebastian gauez, 1968ko abuztuaren 3an dekretuz agindu eta 1969ko azaroaren 4an hiru hilabetez luzatutako salbuespen-egoeragatik protestatzeko. Izan ere, salbuespen-egoeraren ondorioz, milaka lagun atxilotu, deserritu, isundu eta epaitu zituzten epaiketa militarrean. Egia esatera, plaza ez zen

---

100 Txistua jotzeagatik isuna 1964ko abuztuaren 31n jarri zuten; hura ez ordaintzeagatik, berriz, Luis Mari Igartua, Iñaki Urrutia, Iñaki Larrinaga eta Sabino Arana atxilotu zituzten ("Euskal Herria y la Libertad", *Op. cit.*).

101 *Ibidem*. 1966an, adibidez, Armentia jesuitak Bilbon, urtarrilaren 1ean, eta aita Letamendik, abuztuaren 31n. 1968an, berriz, Periko Solabarria, Txomin Artetxe, Pedro Berrioategortua, Iñaki Aurtenetxe, Imanol Orueamezaga eta Josemari Madariaga apaizek, abuztuaren 1ean, eta Xabier Amuriza Zarraonaindiak, abuztuaren 13an. Gero ere ez dira gutxi izan isunak ordaintzeari uko egin dioten apaizak: Naberan, J. Arrien, A Rementeria, A. Idoyaga... 1973an, Félix Bergarari jarri zioten isuna hark emandako bi sermoirengatik; abenduaren 26an, aldiz, Portugaleten, Román Landera apaizari...

102 Arias zenak kontatzen du pasadizo hori liburu honetan: *Proyecto político de la No-violencia*, Nueva Utopía, Madril, 1995, 189 eta 190. or. Egileak onartzen duenez, jende gehiago espero zuten, baina pertsona bakarra batu zitzaien, eta hark ere Madrileko Segurtasuneko Zuzendaritza Nagusiko sotoan amaitu zuen.

103 *Aldaketa16* aldizkaria, 2007ko azaroaren 26, 213, 14-19. or. Ikus, halaber: *Gara* egunkaria, 2007ko azaroaren 19, 26. eta 27. or.

huts-hutsik egon, poliziaren dozena bat inguru jeep han baitzeuden, plaza osoari begira.

1969/02/04. **Gau hartan kantatzeari boikota egin zioten Santa Ageda eguneko abesbatzek**, Espainiako estatu osoan urtarrilaren 24an dekretuz agindutako hiru hilabeteko salbuespen-egoera salatzeko.

1969/05/06. Deustuko ikasleek **boikota** egin zioten Torrejón de Ardozeko AEBko Armadaren musika-bandak eman behar zuen kontzertu bati, vietnamdar herriari elkartasuna adierazteko.

1969ko ekaina. **Zentsuratutako idazlan bat banatu zuen**. Domingo González de Montoya apaizak bere liburua dendatan banatzea erabaki zuen, nahiz eta 1967ko abenduaren 12rako Ordena Publikoaren Epaitegiak zigorra jarria zion, *Dios… ¿en huelga?* argitalpen klandestinoaren egile izatea leporatuta. Atzera ere delitu beragatik kondenatu zuten.[104]

1969/12/22. Zumarragako Orbegozo enpresako langileak elizan itxi ziren, emazte eta seme-alabekin batera, enpresako lan-arazoen aurrean nagusien elkarteak erakutsitako setakeria salatzeko. Guardia Zibilak aterarazi zituen elizatik.[105]

### *70eko hamarkada*

1970. **Ikas dezagun Larzacen gertatutakotik.** Millau eta Languedoc-Roussillon artean, nekazariek aurre egin zioten Larzaceko okzitaniar goi-ordokian eremu militar bat zabaltzeko Frantziako Armadaren saiakerari. Hainbat eguneko baraualdia egin zuten Lanza del Vastorekin batera. 107 lur-jabek **uko egin zioten beren lurrak saltzeari**, eta kooperatiba modura **antolatuko zirela** hitz eman zuten; zenbait elkartek kooperatiba hartan parte hartu zuten: Paysans travailleurs sindikatuak, ekologistek, eragozleek, feministek eta ezkerreko hainbat militantek. Denek ere baserrien alde egitea zuten helburu nagusitzat, bai eta 25.000 ardi buruak zein haietatik ateratzen ziren 1,3 tona esne babestea ere, eta orobat ingurumenari zegozkion kalteak galaraztea. Hala, bada, nekazariek ez zieten militarrei utzi beren lurrak desjabetzerik, eta, gainera, zenbait kanpotarrek inguruko lurralde zabalean lur-sail txikiak erostea bultzatu zuten. Era horretara, tiro-eremu handiagoa egiteko militarren asmoa eragotzi zuten nekazariek. Berdinen artekotzat har ez daitekeen borroka hartan, borroka-metodotzat desobedientzia zibilaz

104 “Euskal Herria y la Libertad”, II. Liburukia, 224. eta 232. or.

105 *Ibídem*, 234. or.

baliatzea erabaki zuten. Hortik sortu ziren geroago globalizazioaren aurkako nekazarien erreferentzia garrantzitsu askoak. José Bové eta Alice Monier borroka haietan zaildu ziren. Zortzi urte igaro zuten Frantziako gobernuaren desjabetze-dekretuak gainditzen, irudimenez betiere: Rodezetik Orleànsera arte protestaldi bat egin zuten traktoreekin; ardiak eraman zituzten **Eiffel Dorre**ra; elkarretaratze jendetsuak izan ziren eta hainbat musikari okzitaniarrek emanaldia eskaini zuten 1973an; *Gardarem lo Larzac* izeneko ekitaldian milaka lagunek kanpaldiak egin zituzten. 1976ko ekainean, hogei pertsonak La Cavalerie kanpamentu militarrari eraso egin zioten, lur-eremuak saltzeko dokumentuak hartzeko.[106]

1970. Bigarren Mundu Gerran bonbaketari batean jardun zuen **Howard Zinn** historialari estatubatuarra, esperientzia gogor hark ukiturik, agian, eta indarkeria-ezaren indar itzelekoan erabat sinetsita, buru-belarri aritu zen 60ko hamarkadan eskubide zibilen aldeko eta gerraren aurkako mugimenduetan. 1970ean, Bostonen, beste zenbait aktibistarekin batera, Zinn ere Vietnamera soldaduak bidaltzea oztopatzeagatik atxilotu zutelarik, **tribunalera joatera behartzen zuen aginduari men egiteari uko egin eta Baltimorera joan zen desobedientzia zibilari buruzko debate publiko batean parte hartzera**. Itzuli zenean, bi poliziak atxilotu eta kartzelan sartu zuten. Baltimoreko hitzaldian, honela zehaztu zuen Zinnek bere jokamoldea:

> "Baten batek esaten duenean desobedientzia zibila dela jorratu beharreko gaia, badirudi esaten ari ez ote garen desobedientzia zibila dela gure *arazoa*. Nolanahi ere, hura *ez* da gure arazoa… gure arazoa, benetako arazoa, *obedientzia* zibila baita. Gure arazo nagusia, izan ere, mundu osoan horrenbeste jendek beren gobernu-buruei aitortzen dien obedientzia da. Gure arazoa da jendea esanekoa dela mundu osoan: pobreziaren eta gosearen eta inozokeriaren eta gerraren eta krudelkeriaren aurrean jendeak men egiten duela etengabe, alegia. Gure arazoa da jendea obeditzailea dela, eta kartzelak lapur txikiz josirik daudela, lapur handienek herria gobernatzen duten bitartean. Horixe da gure arazoa, ez besterik. Legezko estatuak hura sortu baino lehenago nagusi zen justizia eza arautu eta maximizatu du".[107]

1970/09/18. **Bere burua sutan bota zuen harmailetatik behera, Francisco Franco diktadorea han zegoela**, "Gora Euskadi Askatuta" oihu eginez. Joseba Elosegik egin zuen balentria, Donostiako Anoeta pilotalekuan, Nazioarteko Pilota Txapelketa ospatzen ari zela aprobetxatuz. Ez zen hil, baina larri zauritu zen. 1972ko otsailean, Ordena Publikoaren Epaitegiak

106 José Bové eta François Dufour: "Conversaciones con Gilles Luneau", in *El mundo no es una mercancía. Los agricultores contra la comida basura*, Icaria, Bartzelona, 2001eko urtarrila, 60. or.

107 Tania Molina Ramírez, 2005eko apirilaren 24: http://www.jornada.unam.mx/2005/04/24/mas-thore.html

zazpi urteko kartzela-zigorra ezarri zion, legez kanpoko propaganda egiteagatik, eta kalteak eta sutea eragiteagatik. Zergatik egin zuen kontatu zuenean "zerbaiten alde hil egin nahi" zuela esan zuen.[108] Zenbait urte geroago, beste bi pertsonak beren buruari su eman zioten. Biak hil ziren.[109]

1970eko abendua. Burgosko Epaiketa egiten ari zirela-eta, hainbat emakumek –horien artean, besteak beste, Donostiako Aurrera tabernako Juani Mendiola– talde bat sortu zuten. Denen artean, hamarreko taldeak osatu zituzten, **elkartasunezko kate bat osatu eta bakoitzak arrazoi politikoengatik atxilotutako pertsona baten beharrei erantzuteko**. Hala, bada, emakume bakoitzak 2.000 pezeta ordaintzen zituen, eta kartzelan egoteak zekartzan gastuei aurre egiteko, preso bakoitzaren senitartekoei ematen zizkieten. Arropa, janaria eta liburuak ere biltzen zituzten, bai eta abokatuetarako dirua ere. Produktu gehienak taldean parte hartzen zuten pertsonek oparitzen edo egiten zituzten. Gauza bera gertatzen zen, halaber, kazola eta eltzeekin, kartzeletan janaria sartzen uzten zutenean.

1971. Datu ofizialen arabera, urte hartan 2.120 **desertore** egon ziren Frantziako Armadan.[110]

1971/02/21. **Espainiako estatuko lehenengo kontzientzia-eragozlea**. Urtarrilean atxilotu zuten **Pepe Beunza** valentziarra. Haren aldeko nazioarteko kanpainari ekin zitzaion berehala; egun hartantxe, adibidez, Genevatik Valentziara arteko 45 eguneko martxa bati hasiera eman zioten. Martxa hark Gonzalo Arias izan zuen buru. Espainiako poliziak gogor egin zuen martxan zihoazenen aurka Pirinioetako mugan: nortasun-agiri espainiarra zuten bost pertsona atxilotzeaz gain, gainerako manifestarien protestazko eserialdiaren aurka karga bat egin zuen poliziak. Beunza izan zen lehenengo indarkeriaezazko kontzientzia-eragozlea. Dena dela, 30eko hamarkadan ere izan zen armak hartzeari uko egin zionik; hala, esate baterako, 1957tik aurrera, Jehovaren Lekukoek uko egin zioten armadako uniformea janzteari –Alberto Contijochen kasua izan zen nabarmenena–, nahiz eta bakar-bakarrik geratu ziren ekintza mota horretan. 1971ko apirilaren 23an, Beunzak epaiketa militar bati aurre egin behar izan zion, desobedientzia-delitu bat leporatzen ziotelaeta. Haren jardunbidea azaltzen zuen adierazpena irakurtzeari ekin zion

108 Bere oroitzapenetan, Gernikako bonbardaketaren lekuko horrek honela utzi zuen idatzirik: "Ez dut Franco hil nahi. Haren begietan izua ikusi nahi dut islaturik, ez besterik".

109 1972ko urriaren 14an, bere buruari su emanda hil zen Miarritzen N'Guyen Van Dong, Javalquintoko lorategietan. Euskal errefuxiatuei bidaltzen ari zitzaizkien erbesteratze-gutunen aurkako ekintza izan zen hura. *Jon* gaitzizenaz baliaturik, gazte hark euskaldunek jasotako gutunak helarazi zizkien Frantziako hedabideei. Haiek erbesteratzen bazituzten, bere buruari su emango ziola agindu zuen Van Dongek. Halaxe egin zuen, hain zuzen. Hiru urte geroago, 1975eko ekainaren 13an, Jacques Andreuk su eman zion bere buruari Paueko espainiar kontsulatuaren aurrean, Euskal Herriko egoera larria salatzeko; batez ere, Garmendiaren eta Otaegiren aurkako epaiketak arbuiatzeko. ("Euskal Herria y la libertad", III. Liburukia, 204. or., eta IV. Liburukia, 161. or.)

110 Javier Fernández. *Op. cit*., 73. or.

defentsaren abokatuak, baina laugarren paragrafora iritsi zenean, Epaitegi Militarraren presidenteak hura eten eta irakurtzen jarraitzea galarazi zion. Besteak beste, honako hau esan nahi izan zion tribunalari valentziarrak:

> (…) Katolikoa naiz, bai, baina ez noa arrazoi hori nire alde erabiltzera; izan ere, nire herrian gotzainak goi-mailako militar bilakatu dira, eta ohore militarrak ere ematen dizkiete; militarren desfileetan parte hartzen dute haietako askok (…) Nire ustez, hobe da arrazoi etikoez hitz egitea: indarkeria-ezaren aldekoa nauzue; nire iritzirako, Historiak nahi beste adibide eskaintzen dizkigu konturatzeko indarkeriak ondorio izugarriak baizik ez dakartzala, eta, beraz, gizartean aldaketak eragingo baditugu, hobe dugula ohartzea beste bide batzuk urratu beharko genituzkeela.
>
> (…) Nire ustez, bizi garen denboraren ezaugarriaren mendean gaude, zuek inoiz gerarazi ezingo duzuen ezaugarri onuragarri baten mendean, alegia. Ez zaitezte saia hura oztopatzen, ez kartzelaren bidez, ez zigorraren bidez. Hura zenbat eta lehenago legez onartu, orduan eta lehenago askatuko gara kateatzen gaituzten haren ondorioetatik; gu haien biktima baizik ez baikara. Errugabea nauzue, eta berriro diotsuet ez nauzuela zuek epaitzen; izan ere, ni neu etorri naiz hona nire borondatez, hemen egiten ari zareten bidegabekeria salatzeko. Kondena nazazue, beraz, hala nahi baduzue (…).[111]

Nolanahi ere, soldadutzaren aurka borrokan ziharduten kontzientzia-eragozleen jardunak ez zuen bakerik izan 1996. urtera arte. Beunzari bigarren epaiketa militarra egin zioten, eta Saharako zigor-batailoi batera bidali zuten: guztira, 3 urte eta 4 hilabete eman zituen 10 espetxetan baino gehiagotan. Pepe Beunzaren ondoren, JOC elkarteko Jordi Agulló ere kondenatu zuten, bai eta itsas armadan soldadutza egiten ari zela eragozle bihurtzea erabaki zuen Joan Guzmán ere; Víctor Boj, halaber, kondenatu egin zuten, bere soldadu-lerrotik atera eta bakezalea zela oihuztatu zuenean. Milizietako sarjentu Rafa Rodrigo umiliatu egin zuten, Pepe babesteko gutun bat idatzi zuela-eta. Soldadutza bukatzera behartu zutenean, bere burua eragozletzat jo zuen, eta epaiketa militarrean zigortu zuten.[112]

1971/09/15. **Greenpeace sortu** zuten. Kanadako energia nuklearraren aukako dozena bat inguru aktibistak eta Kanadan babestutako hainbat kuakero nahiz kontzientzia-eragozle estatubatuarrek ekintza bati ekin zioten: AEBk **Vietnamgo gerran parte hartzea** galarazi nahi zuten; horixe zen haien helburu nagusia. Talde txiki bat sortu zuten orduan: *Don't make a wave*

111 MOC: *En legítima desobediencia. Tres décadas de objeción, insumisión y antimilitarismo*, Traficantes de Sueños, Madril, 2002ko martxoa, 19. or.

112 Pedro Oliver Olmo: *La utopía insumisa de Pepe Beunza*, Virus, Bartzelona, 2002. Eta MOC*: Op. cit*.

*Committee* ("Ez ezazue itsasikararik sor" izeneko komitea, alegia). AEBk Kanadaren iparraldean, Amchitka artxipelagoan (Alaska), egiten ari ziren proba nuklearren aurka protesta egin zuen talde sortu berriak. Era guztietako ekimenak antolatu eta gero, Phillys Cormack izeneko arrantzontzia itsasoratzea erabaki zuten, proba nuklearra egin behar zeneko lekuraino joateko; hala, **haien presentziaren bidez, lehergailuak eztanda egitea galarazi nahi izan zuten**. Lortu ez zuten arren, probak bi egunez atzerarazi zituzten, eta mugimendu garrantzitsu eta geldiezin baten hazi bihurtu zen ekintza hura.

1972. Nazioarteko martxa Vatikanora, Espainiako estatuko kontzientzia-presoentzako askatasuna eskatzeko. Ehunka lagun bildu zen han, presoz mozorrotuta eta hainbat hizkuntzatan idatzitako kartelak zeramatzatela.

1972. **Chipko mugimendua sortu zen.** Lurraren aldeko talde hindua zen hura, eta haren sustatzaile garrantzitsuenen artean, berriz, Gandhiren bi jarraitzaile zeuden: Mira eta Sarala Bhen; hantxe ziren, halaber, Sunderlal Bahugana eta 70eko hamarkadan horrenbeste borroka egiten ziharduen **Vandana Shiva** idazle ekofeminista. *Chipko* hitza hindi hizkuntzatik dator, eta besarkatu esan nahi du. Horixe zuten helburu, hain zuzen, taldeko ekintzaileek: lurraren komunitate-ustiapenei eutsiz eta zuhaitzen erabateko suntsipena galaraziz, haiek besarkatzea, alegia. Chipko taldeko kide bakoitzak –emakume baserritarrak gehien gehienak– **moztekotan zegoen zuhaitz bat adoptatu, hari lotu eta ahalik eta indarrik handienaz eusten zion**, Indiako zur-konpainia erraldoiek **haiek errotik moztea galarazteko**. Desobedientzia zibila ezaugarri nagusitzat zuen erresistentziazko ekintza horiek Gandhiren *Sarvodaya* kontzeptuan oinarritu ziren; beraz, zuhaitzak errotik moztea atzeratu zuten. Haiekin batera, ordea, indarkeria-ezazko beste hainbat ekintza ere bultzatu zituzten; hala nola, **zur-ustiapenen enkanteei boikota** eta **gose-greba**. Shivak *lurraren aldeko demokrazia* kontzeptua sortu zuen, eta hura justizia sozialean, demokrazia deszentralizatuan eta ingurumenaren iraunkortasunean oinarritu. Vandana Shivak Nobel Sari Alternatiboa jaso zuen 1993an.[113]

1972/05/06. Zeanuriko erretore Martín Olazar Uribek **hildako frankistei eskainitako harlosa bat kendu zuen elizatik**. Hargatik, gobernu-agintariek 150.000 pezetako isuna jarri zioten. Hala ere, Añoveros elizbarrutiko gotzainak **uko egin zion apaiza prozesatzeari**, agintari zibilek horixe eskatu bazioten ere.[114]

113 Vandana Shiva: *Manifiesto para una democracia de la tierra. Justicia, sostenibilidad y paz*, Paidós, Bartzelona, 2006.

114 "Euskal Herria y Libertad". *Op. cit*., 3. Liburukia, 203. or.

1972/10/01. Dozena bat kontzientzia-eragozlek gizarte-zerbitzu bati ekin zioten, Zuberoako tailer alternatibo batean. Hala, entzungor egin zioten Brégançon Dekretu berriari. Haren arabera, eragozle guztiek nahitaez lan egin behar zuten *Office National des Forêts* (ONF) izeneko erakundean. Esperientzia pilotu horren bidez, Frantziako estatuko hainbat tokitako herritarrek desobeditu zioten ONFren aginduari, eta haiek hartzen zituzten **baserritarrek**, berriz, **kartzela-zigorrak eta 10.000 franko (1.500 euro) arteko isunak jasotzeko arrisku bizia zuten**. 1972. eta 1980. urte artean, berrogeita hamarren bat eragozle izan ziren zuberotar tailer alternatiboan.[115]

1973. Frantziako estatuan, **hainbat herritarrek beren soldadu-txartelak itzuli zituzten.** 1973. urtetik 1975. urtera bitartean 300 lagunek itzuli zuten txartela, eta 1976an, ostera, beste 300ek. Herritar haietatik %4 prozesatu zituzten.[116]

1973ko martxoa. **Errekaldeberriko herri-unibertsitatea** abiarazi zuten Bilbon. Ikasturte bakoitzean, ikasleekin batera hitzartzen zituzten irakasleek ikasgai zein ikasketa-programak, langileen eta herritarren aldeko ikusmolde batetik betiere; "erraza, bai, baina baita zientifikoa ere". Irakasleek ez zuten ordain-saririk jasotzen, nahiz bazegoen egon matrikulazio-kuota bat, gastuak eta beste ordaintzeko. Unibertsitateak 13 urte iraun zuen. Martxan jarri zituzten, orobat, **Herri-liburutegi bat eta Komikiteka bat**.

1973/04/02. 3.000 ikaslek **manifestazioa** egin zuten Baionan, hezkuntzarekin eta soldadutzarekin zerikusia zuten Frantziako gobernuaren bi erreformaren aurka.

1973ko maiatza eta ekaina. **Motor Ibérica**. Noaingo enpresa ezaguna. Bi hilabete horietan sorturiko egonezinak 1936ko gerraz geroztik deitutako lehenengo greba orokorra ekarri zuen Nafarroara. Uztailaren hasieran, epaiketa baten esperoan zeuden bederatzi langilek kartzelan jarraitzen zuten oraindik, eta hori salatzeko, Iruñeko peñek berea egitea erabaki zuten; hilaren 9an honela adierazi zuten: **"Korridaren ostean, gu zezen-plazan geratuko gara"**; beraz, **"ez da peñarik egongo kaleetan"**. Hala, bada, egun horretan peñek beti bezala egin zuten jauzi hondarretara, baina ez zeramaten pankartarik, eta "aska ditzatela" egiten zuten oihu, ozen-ozen. Ondoren, berriz, ez zuten dantzan jardun Iruñeko kaleetan barna.[117]

1974. **Indarkeria-ezazko Alternatiba baten aldeko Mugimendua** (MAN) sortu zen. Indarkeria-eza oinarritzat zuten hainbat taldek sortu zuten

115 Garikoitz Mujika Zubiarrain: *Gazte Matxinada*, Xirika, 2004ko azaroa, 199. eta 200. or.

116 Javier Fernández: *Op. cit.*, 72. or.

117 José Vicente Iriarte Areso: *Op. cit*., 149. eta 164. or.

mugimendu berria; batasunaren berri ematen zuen oinarrizko adierazpen bat ere argitaratu zuten: “Indarkeria-ezazko Alternatiba baterako Manifestua” izenekoa, alegia. Indarkeria-eza aktiboari buruz gogoeta-saio ugari egindako gizon bat izan zen talde sortu berriaren sustatzaileetako bat: **Jean Marie Muller**. Euskal Herriko hainbat taldek (Demoek eta Bidea Helburuk, kasurako) erruz ikasi dute haren idatzietatik, eta eguneroko jardunerako, zenbait elementu ere hartu dizkiote pentsalari eta ekintzaile frantziarrari. MANek oinarrizko zeregintzat izan zuen indarkeria-ezaren inguruko sakontze-lan teoriko zein praktikoa bultzatzea, bai eta, indarkeria-ezak gizarte sozialista buru-kudeatzailea sortzeko garaian zer-nolako onurak ekar ditzakeen ikertzeko, elkarrizketa politiko eta sindikala sustatzea ere. Ondorengo urteetan, taldearen pentsamolde zein estrategia argi eta garbi adierazirik utzi zuten ikuskera politiko huts-hutsetik idatzitako agiri batean: “Sozialismo buru-kudeatzaile baterantz: indarkeria-eza politikoa” izenekoan, alegia.

1974/04/25. **Krabelinen Iraultza** Portugalen. Indarkeria-ezazko gertaera bat izan ez bazen ere, egia ere bada gertu-gertuko erreferentzia izan zela hura, eta haren garapenari zehatz-mehatz begiratu zitzaiola, iraultza odolgabea izan zelako, ziur asko, Portugalgo hura. Jakin badakigu honezkero ezkerreko militarrek piztu zutela matxinada; gehien-gehienak *Movimento das Forças Armadas* (MFA) esan zitzaion taldean parte hartu zuten kapitain eta ofizial gazteak izan ziren. Iraultzari ekin baino urtebete lehenago sortu zuten talde hori, eta den-denek baterako zuten diktadurarekin akabatzeko itxaropena, bai eta kolonietako gerran ziharduten armadaren tropak etxeratzeko asmo sendoa ere. Helburu nagusitzat, beraz, bi hauek: askatasun demokratikoak ezartzea, eta Antonio Oliveira Salazarren polizia politiko beldurgarriarekin amaitzea –PIDE esaten zioten hura bene-benetan baitzen beldurgarria–. Kalera ateratzeko seinale bat adostu zuten apirilaren 25ean; hala, Renascença irratian José Alfonsoren “Grândola vila morena” abestia entzutearekin bat, denek jauzi egin behar zuten kaleetara. Halaxe gertatu zen, beraz, eta MFAko kapitainak buru zirelarik, tankeek herrialde osoko hainbat leku estrategiko hartu zituzten. Herritarrak berak ere kalean ziren (“Izkin bakoitzean topa zitekeen adiskideren bat...”), eta Armada osoa gehitu zitzaion matxinadari. Jendea tankeetara igo eta krabelin gorriak jarri zituen kanoietan, bai eta soldaduen fusilen ahokoetan ere. Herritarrek bete-betean erantzun zioten erreboltari, eta halaxe erori zen diktadura. Ez zen batere borroka odoltsurik egon (nahiz eta PIDEko kideen aurkako hainbat eraso menderakaitz gertatu ziren). Kapitainek berehala eman zioten boterea Salbazio Nazionalaren Batzordeari, haiek inoiz ez baitzuten nahi izan inolako protagonismoa izaterik; bai, ordea, boterea eskuratu ahala hura gizarte zibilari ematea (erruz eztabaidatu zuten,

hala ere, armadaren zereginari buruz, bai eta hark "konkistaren bermatzaile" izan behar ote zuen). Diktadurarekin akabatu zutenean, gerrari amaiera eman zitzaion, eta Mozambike nahiz Angola deskolonizatzeari ekin zioten. Preso politikoak askatu zituzten, eta deserrituak, berriz, etxera itzuli ziren. Bankuak nazionalizatu zituzten, bai eta industria gehiena ere; MFAk berak ere sozialismoranzko trantsizioari helduko ziola adierazi zuen. Langile-, bizilagun- eta soldadu-komisioak sortu zituzten, batez ere autogestio-saiakera halako bat martxan jartzeko; era berean, hainbat lur-sail okupatu zituzten, eta, orobat, hutsik zeuden zenbait etxebizitza. Dena den, iraultza bukatu zenetik urtebetera egindako hauteskundeetan galtzaile irten ziren haren aldeko alderdiak, eta horrenbestez, apirilaren 25ean abiarazitako prozesua gainbehera joan zen pixkanaka-pixkanaka.

1975/01/07. **Itxialdia meatzean, jendearen arreta pizteko**. Nafarroako Potasas enpresaren zuzendaritza-taldeak bi hilabetez lana eta soldata kendu zizkien bi mila langile ingururi. Hala, bada, meatzean itxialdia egitea erabaki zuten. 47 langilek baizik ez zuten lortu Undioko putzuaren ahora iristea. Gainerako langileei, aldiz, han sartzea galarazi zien Guardia Zibilak. Agenteek irmo eutsi zioten sarrera zaintzeari, baina, egunak joan egunak etorri, meatzean hainbat elkarretaratze egin zituzten langileek. Hilaren 15ean, elkartasunezko greba ia erabatekoa egin zuten Nafarroan, eta 200 enpresatan baino gehiagotan utzi zioten lan egiteari. Hainbat xede lortu zituztela-eta, langileek itxialdia eten zuten 14 egunen ostean. Hala ere, langile haietako batzuk TOP beldurgarriak prozesatu zituen, sedizio-delitu bat leporatuta, eta kalera bota zituzten, gainera. Apirilaren 7an, epaileen aurrera eraman zuten kasua, eta estatuko hainbat tokitako 20 langile-abokatu heldu ziren, epaiketan parte hartzeko. Aretoa hustu eta epaiketa bertan behera utzi zuten.[118]

1975eko otsaila. Frantziako 225 eragozle intsumisok beren **"norako agindua" itzuli zuten**.

118 Langileek hainbat lan-uzte egin zituzten, enpresak haien eskaerak onartuko zituelakoan (urtero soldata igotzea, lan-orduak murriztea eta aurreko hamabi gatazketan lanetik botatakoak berriro hartzea). Azaroaren 21ean, langileak argibide-batzar bat egiten ari zirela, segurtasun indarrak Iruñeko katedralean sartu eta han zeuden guztiak indarrez kaleratu zituzten. Urtarrilaren 7an beste batzar bat egin zuten langileek, baina hura ere aurrekoaren moduan amaitu zen, Guardia Zibilak sakabanatuta, alegia. Hala, bada, iritzi publikoaren arreta piztuko zuten hainbat ekimen egitea erabaki zuten langileek, batez ere 70 egunetan nagusi izan ziren intrantsigentziarekin eta zigorrekin behin betiko bukatu nahirik. Beraz, beren buruak meatzean ixtea erabaki zuten. Barrenean egotea lortu zutelarik, haraino iritsi ziren 47 langileek 8 kilometro korritu zituzten, lur-azpiko galerietan barna, harik eta Espartza meatzera iristea lortu zuten arte; hantxe geratu ziren. Ibilaldi gogor hark ia 9 ordu iraun zuen, baina ez zen izan, horratik, itsu-itsuan hartutako neurria. Lur-azpian bizirik irauteko behar-beharrezkoa zitzaien guztia pilatu zuten aurrez: 250 tableta txokolate, 200 kaxa galleta, kanpin-gasezko 3 su txiki, larrialdietarako botika-ontzi bat, 200 lata kontserba, 17 kilo esne kondentsatu, eta abar. Itxialdian parte hartzen ari zirenek hainbat gauzatan ematen zuten denbora: musean, meatzea ikuskatzen, segurtasunari buruzko txostenak idazten, lau ordu inguruko batzarrak egiten eta jotak abesten. Kanpoan, berriz, elkartasunezko mobilizazio garrantzitsu askoa sortu zen (Jauregi eta Vera, 936-939. or.).

1975/02/23. **Lurrak okupatu zituzten** AEFn, **Wyhlen zentral nuklear bat eraikitzeko**. Energia nuklearraren aurkako hainbat mugimenduk hura geraraztea lortu zuen, horretarako kontsentsua, indarkeria-eza eta alderdi politikoekiko independentzia baliatuz.[119] Okupazioan **Adiskidetasunaren Etxea eta Wyhleko Herri Unibertsitatea eraiki zituzten**. Azken horrek hiru urte iraun zuen, eta energia atomikoak dakartzan arazoak eta hari aurre egiteko baliabideak zer-nolakoak diren ikastea zuten helburu nagusitzat, bai eta herritarrei ahalik eta informazio gehiena ematea ere.[120]

> "Metropoliko indiar maiteak: Galdera askotxo egiten duzue. Wyhleko kontua zertan den jakin nahi duzue. (...) Indarkeriaz zer iritzi dugun galdetzen diguzue. Ez gaude, inolaz ere, haren alde; ez, oro har, mafia atomikoaren alde, ez gobernuen alde, ez Justiziaren alde. Hargatik bultzatzen ditugu haien eta gure arteko alde nabarmenak agerian ipiniko dituzten ekintza motak. Zehazki esateko: ez diegu eman nahi telebistari zein hedabideei haiek etsaiaz eman nahi izan ohi duten irudirik. Ez dugu poliziaren pareko agertu nahi, kaskoa, ezkutua eta borra soinean daramatzagula. Horrek ez du esan nahi arkumetxoen gisan arriskua saihesten dugunik; ikusi dituzue halakoak ere azken urteetan. Dena den, ez dugu batailarik galdu nahi, jendea erakarri nahi dugu. Fessensheimen hagak erortzen ari zirela, inork ez zuen "Indarkeria!" oihuztatu. Inork ez zigun, orobat, esan lapurrak ginenik katastrofe-egoerarako agiri sekretuak argitaratu genituenean. Eta, jakina, simaurrezko uraz baliaturik poliziei aurre egin genienean ere, inork ez zuen pentsatu hura eraso bat zenik, parodia bat baizik. Guk arrazoi ezin hobeak izan ditugu hiztegi militar bati uko egiteko, eta ez gara, inondik ere, Estatu Nagusiko elitezko talde bat. Gure ahalmenen neurrian, ordea, saiatzen gara ahoa gehiegitxo ez zabaltzen, ez eta gure burua gehiegi berotzen ere; horrek, noski, eskarmentu eta diziplina itzelekoak eskatzen ditu".
>
> "Interesgarria litzateke Metropoliko indiarrek denbora gehiago ematea herrian edo okupaturiko lekuan; hau da, ez daitezela han egon bisita bat egitera joan izan balira bezala. Hala ere, kontu horretan ez dago esateko askorik; jarrera kontua baizik ez dela, horixe esango genuke, ezer esatekotan. Hortxe daude aldeak; hots, badirela hainbat eta hainbat gatazka, baina inor ez dela herriarekin nahasten. Zer egin liteke gatazka horrekin? Galdera horrixe erantzun beharko genioke. Badira megafonoa dakartenak; beste zenbaitek, aldiz, magnetofonoa

119 Petra K. Kelly: *Luchar por la esperanza. Sin violencia hacia un futuro verde*, Editorial Debate, Madril, 1984, 43. eta 45. or. Kellyk begi onez behatzen dio Wyhl inguruan sortu zen indarkeria-ezazko erresistentziari. Gauza berari buruz mintzo da Marisa Revilla Blanco artikulu honetan: "Una parte del arco iris. El ecologismo y el pacifismo y sus efectos transformadores", 169. or., *in* Marisa Revilla Blanco, Paloman Román eta Jaime Ferri (ed.): *Los movimientos sociales. Conciencia y acción de una sociedad politizada*.

120 *Energía atómica y lucha ciudadana. Textos del movimiento antinuclear alemán*, Icaria, Bartzelona, 1978.

> dakarte. Hainbat lagunek dena dakitela ematen du; beste hainbat, berriz, gauza berriak ikasteko gosez etortzen zaizkigu"...[121]

1975eko iraila. Errepresioaren aurkako plataformek **hainbat ikurrina** jarri zituzten Donostian; estropada egun handia zen hura, eta ikurrina asko ikus zitezkeen nonahi: Kontxako hondartzan, Santa Klara uhartean eta moilan. Polizia ugari hurbildu zen Donostiara, bandera haiek kentzeko.

1975/12/24. **Zerbitzu zibila eta boluntarioak, garapena sustatzeko**. Zazpi kontzientzia-eragozlek Beunzak hasitako bideari jarraitu zioten Bartzelonan, eta hala, Hospitalet de Llobregateko Can Serra auzoan komunitatearentzako zerbitzu zibil bati ekin zitzaion. Gazteek soldadutza egitera joan behar zuten arren, haiek beren denbora eta indarrak zerbitzu zibilari ematea erabaki zuten. Haietako bakoitzak gutun bat igorri zion nork bere kapitain-jeneralari, hasitako gizarte-lanaren berri emanez, eta soldadutza egiteko batere asmorik ez dutela jakinaraziz. Esteban Zabaleta apaizgai euskalduna ere han zen, tartean. Hilabeteren buruan atxilotu zituztenean, beste talde batek jarraitu zion hasitako lan komunitarioari, bai helduentzako eskoletan, bai auzoko haurtzaindegian. Bilbon bertan antzeko ekimen bat sortu zuten.

> "Jakitun gara hau egiten ari garelarik, gaur egun indarrean dagoen legeari desobeditzen diogula; beraz, ez diogu bizkarra ematen goizago edo beranduago kartzelatuak izateko posibilitate ziur samarrari. Gure lekukotasunak balio dezala legeak kontzientzia-eragozpena onar dezan, horixe baino ez dugu espero (...) Ziur gaude kolaborazioak eta denen arteko errespetuak klaserik eta gerrarik gabeko gizartea ekarriko digutela: anai-arreben arteko gizartea, alegia (...) Bakea nahi badugu, ez dezagun gerra prestatu; ekin diezaiogun lehenbailehen bake-bideak egiteari ".[122]

1975/12/25. 9 hilabetez, **Lluís M. Xirinacsek 12 ordu eman zituen egunero Bartzelonako Modelo kartzelaren aurrean**. Haren eskakizun nagusia preso politiko guztientzako amnistia eskatzea zen. Legea onartu zutenean, protestaldian bertan behera utzi zuen. Hainbat aldiz poliziek gogor jipoitu zuten.[123]

1975eko azken hondarra eta 1976ko hasiera. **Bakearen Etxea** sortu zuten Bilboko Harategi Zaharra kalean. Urte hartan bertan Bakearen Etxea sortu zuten Iruñeko Milagrosa kalean.

121 *Ibídem*: *Respuestas desde la provincia*, Walter, 98-105. or.

122 Can Serrako manifestua; Javier Fernández: *Un camino hacia la paz*, 52. or.

123 Gonzalo Arias: Op. cit., 194. eta 195. or.

1976/02/26. **Kartelak eta jantzi marradunak soinean zeramatzatela**, 13 pertsonak martxa bat egin zuten Bilbon, Don Diego Lopez Aroko Kale Nagusian hasita eta Areatzako Plazan bukatzeko.

1976/03/05. Hogei lagun Bilboko San Anton Parrokian **itxi ziren**, eta **bost egun eman zuten barauldian**, martxoaren 3an Gasteizen gertatua salatzeko (5 langile hilik eta beste 100 zauritu). Indarkeria-ezazko metodoen alde dei egin zuten.

1976/12/05. **Ikurrina bat zeramatela atera ziren zelaira**. Urtebete lehenago hil zen Franco, baina ikurrina legez kanpo zegoen artean. Dena den, egun hartan Athleticeko eta Realeko jokalariek ikurrina atera zuten Donostiako Atotxa futbol-zelaian. Ikusleek zutik eta bihotzak bero erantzun zieten, txaloka. Talde bakoitzeko kapitainek, Iribarrek eta Kortabarriak, zeramaten bandera, De la Hoz Urangak lagundurik. Reala izan zen garaile, 5 eta 0.

1976-1977. Bilboko Errekalde auzoan, 10 lagun elkarrekin bizitzen jarri ziren, eta halaxe jarraitu zuten bi urtez, **zerbitzu zibil bat martxan jartzeko**. Abiarazi zituzten ekimenen artean, baziren bi aski garrantzitsuak: **haur-eskola eta alfabetatze-eskola**. Antzeko beste proiektu batzuk sortu zituzten Sestaon, Portugaleten, Barakaldon, Durangon, Donostian, Gasteizen, eta beste hainbat herri eta hiritan.

1977ko urtarrila. Ordurako lanean ziharduten ekintzaileen elkarlanaren bidez, **Kontzientzia Eragozleen Mugimendua** sortu zuten Espainiako estatuan. Hego Euskal Herriko hainbat taldek parte hartu zuten haren sorreran.

1977/02/19. Alemaniako Errepublika Federalean, Grohndeko zentral nuklearreko **obrak okupatu zituzten**. Ekintzaileek goiburu honi segitzen zioten: “loreak polizientzat, guraizeak burdin hesiak mozteko”. Geroago, ordea, estrategiaz aldatu zuten.[124]

1977ko apirila. 17 herritako gazteek bilera egin zuten Tolosan, kanpaina bat abiarazteko. Han ziren, tartean, kontzientzia-eragozleak, desertoreak, independenteak eta Gaztedi Abertzale Iraultzaileak (GAI) taldeko kideak (aurrerago, berriz, IT eta beste hainbat talde sartu ziren kanpainan)[125]. Ez zuten erabateko adostasunik lortu, baina hantxe sortu ziren **lehenengo Komite Antimilitaristak**.

124 Indarkeriari aurre egiteko indarkeriaz baliatzen zirenek lekuan lekuko ekimenak birrindu zituzten, eta batez ere, hainbat zauritu eragin zituzten hango gorabeherek. Ekintzaile askok, gainera, protestaldia utzi zuten. Horren guztiaren ondorioz, tentsio handiko eztabaida piztu zen energia nuklearraren aurkako mugimendu alemanean. Horren berri jakin nahi izanez gero, ikus hemen: “Energía atómica y lucha ciudadana. Textos del movimiento antinuclear alemán” (*Op. cit*), 85-97. or. Ikus lan horretan indarkeria-ezazko ekintzari buruzko printzipio nagusiak.

125 Arrasate, Azpeitia, Bilbao, Donostia, Eibar, Elgoibar, Errenteria, Gasteiz, Irun, Iruñea, Lasarte, Markina, Mutriku, Oñati, Pasaia, Zarautz eta Zumarraga

1977/04/30. **Maiatzeko Plazako Amak**. Argentinako diktadurak atxilotu eta desagerrarazi zituen pertsonen amak kalera irten ziren lehenengo aldiz. Lehenengo agerraldia Buenos Aireseko Maiatza Plazan egin zuten, Presidentziaren egoitzaren pare-parean. Beraien familiartekoak non zeuden baizik ez zuten jakin nahi. 14 lagun hasi ziren elkartzen, ostegunero, eta handik gutxira 300 edo 400 ama inguru hasi ziren biltzen. **Buruko txuri bat hartu zuten sinbolotzat**. Militarrek ez zuten gogoko ekintza mota baketsu hura, eta urte hartako abenduan, ekimenarekin zerikusia zuten dozena bat lagun atxilotu zituzten: taldea sortu zuten hiru ama, bi moja eta giza eskubideen aldeko zazpi ekintzaile. Elkartea sustatu zuten emakumeen artean sortzez Lodosakoa zen Mercedes Colás Irisarri zegoen. 12 urte zituela, ilea larru-arrats moztu zioten falangistek, CNTn mitin politikoak egitea leporatuta; gero, haren aita fusilatu zuten, eta familiarekin batera Argentinan deserritu zen. Han bizitza berri bati ekin zion, baina militarrek haren alaba Alicia bahitu zuten.[126]

1977/05/21. **Norberaren ardura aldarrikatu zuten**. Ekologistak nahiz kontzientzia-eragozleak Bilboko Kirol Pabiloiaren sarreran elkartu ziren, Iberduero enpresa elektrikoak batzar orokorra egin behar zuela-eta. Kartelak ikusgai zituztela, Lemoizko zentral nuklearraren proiektuaren aurkako arrazoiak azaltzen zuen esku-orri bana eman zieten akziodunei. Panfletoan honako hau irakur zitekeen: "Akziodun hori: erabakiak zuzenean ez hartzeak ez zintuzke arduragabe bihurtu behar, zuk ere bai baitaukazu zer esanik Iberduero SAk proiektu nuklearretan duen ardurari buruz (...) Ez egon atentatua noiz egingo den zain. Zure burua sakon informatzeko betebeharra duzu (...) Bestela, zure ardurei erantzutea eskatuko dizu herriak. Isiltzen bazara, Euskal Herriaren aurkako genozidioa babestuko duzu. **Egizu oihu. Informa zaitez!**".[127]

1977ko iraila. **Eserialdia-jazarpena-eserialdia**. Hilaren 5ean Xabier Muela eragozlea Bilbon atxilotu ostean, KEM-MOC elkarteko lau kidek eserialdi bati ekin zioten Donostiako Gobernu Militarraren aurrean; beste hamar eragozle atxilotu zituzten martxoaz geroztik. Poliziak donostiar eragozleak atxilotu zituen. Iruñeko ekintzaileek pankarta bat ipini zuten, atxilotu guztientzako amnistia eskatzeko. Hilaren 15ean, Bilboko eragozleak Baserritarren Kutxaren burdin hesira kateatu ziren atzera ere. Denak atxilotu zituzten. Bi egunen buruan, Arabako Gobernu Miliarraren aurrean eserialdia egin zuten Arabako eragozleek; han ere denak atxilotu zituzten. Hilaren 24 eta

126 Iñaki Egaña: *Op. cit.*, 127. or.

127 Energia Nuklearrik gabeko Euskal Kostaldearen Aldeko Komisioa: *Hacia una costa vasca nuclear? (El caso de Lemóniz)*, bertako kideek argitaratua, bigarren liburukia, Erandio, 1977, 131. or.

25ean, berrogeita hamarren bat eragozlek manifestazioa egin zuten Araka eta Gamarrako kuarteletatik Bilboko Garellanoko kuarteleraino. Zenbait manifestari presoz jantzita zeuden. Guardia Zibilak eta Polizia Armatuak bidean zihoazela gelditu eta kartelak kendu zizkieten. Dena dela, hurrengo egunean, Bilboko 10 eragozlek, Gasteizko 5ek eta Gironako 2k gose-greba bati hasiera eman zioten. Figueresko kartzelan bost eragozle euskaldun zeuden preso. Italiako diputatu Marco Penella erradikalak berak ere barau egin zuen kontzientzia-eragozpenaren alde eta epaiketa militarren aurka. Hilaren 28an berriro ere, beste hainbat eragozlek beren burua kateatu zuten Donostian. Eta halaxe jarraitu zuten puska batean...

1977/10/28. **Okupazio eta gaztetxe aitzindariak**. Espainiako Gazteen Elkartearen (OJE) lokal zaharrak husten hasiak zeudela-eta, hainbat gazte beldur ziren haiek ez ote zituzten erabiliko beraiekin zerikusirik ez zuten beste zenbait kontutarako; hala, bada, zenbait taldek **haiek okupatzea erabaki zuten**. Horretarako, hainbat herritako gazteen asteak aprobetxatu zituzten (halaxe egin zuten Iruñean, Lazkaon, Oñatin eta Bizkaiko beste herri batzuetan); gauza bera egin zuten Gazteen Biltzarrek (Azpeitikoak, kasurako) eta Elgoibarko “Herriko Gazteria” elkarteak. Donostian ere saiatu ziren gazteak beste toki batzuetan hasitako bidea urratzen: saialdi ezagunena 1978ko apirilaren 20an egin zuten, Prim kalean, baina ez zuen arrakastarik izan. Dena dela, 1983ko martxoaren 12an *La Voz de España* egunkariaren lokal zaharrak (San Martzial kalean zeudenak, alegia) okupatu eta han “Gazteen Etxea” sortzen saiatu ziren; 70 gaztek eta 28 taldek parte hartu zuten okupazioan, eta maiatzera arte iraun zuten barruan.[128] 82. Urtean, berriz, Oñatiko gazteek haien aldeko 600 sinadura lortu zituzten, bai eta mobilizazio ugari ere. Sestaon Gazteen Etxe bihurtu zituzten OJEren lokalak.

Urriaren 2 eta 12a, eta 1977ko azaroaren 20a. **Soldadutzaren aurkako lehenengo manifestazioak**. Hiru manifestazioak Donostian egin zituzten[129]; urriaren 12an, halaber, sinadurak biltzeari ekin zioten Bilbon. Donostiako Gobernu Militarraren aurrean, Polizia gogor oldartu zen manifestazio haietatik biren aurka, eta hainbat lagun zauritu eta atxilotu zituzten; den-denak eraman zituzten Adin Txikikoen Jagon Epaitegira (artean indarrean segitzen baitzuen hark).

08/12/1977. Bilbon, **bizikletaz** egindako lehenbiziko manifestazioa.

128 Jon Markel Ormazabal Gaztañaga: *Donostin, 28 urte okupatuz, 1977-2005*, Egilearen argitalpena, 10. or. 1982. urteko ekimen hura Donostiako Gazteen Etxebizitzaren aldeko Gestorak abiarazi zuen; haien bi goiburuak hauexek: “Lokalak gazteontzat” eta “Egin zerbait, ez lokartu”. *Satán* aldizkaria ere argitaratu zuten. Poliziak lokalak husteari ekin zion bitan, eta 27 gazteren aurkako epaiketa egin zuten 1984ko urtarrilean.

129 Deitzaileak honako hauek: KEM-MOC, GAI, IT, JIC, EGG, EGAM eta IAM.

01/01/1978. Iruñean, **Gaztelu Plaza okupatu zuten sinbolikoki**. Etxebizitzarik gabeko familiek eta haien alde ziharduten hainbat lagunek festa handia egin zuten urtarrilaren 1ean, iruindarrek beren **egongela**tzat duten Gaztelu Plazan. Arazo larri horren aurrean, herritarren adierazpide nagusia festa izan zen (trikitilaria, txistulariak, dantzariak, eta abar), bai eta solidaritatea ere. Plazan bizileku hartu zuten lehenbiziko maizterrek dozena bat kanpin-denda ipini zituzten Diputazioren pareko lorategian; alboan, berriz, taberna moduko bat jarri zuten, ogitartekoak, edariak eta pegatinak saltzeko. Etxerakoizko haurren musika-bandak alaitu zuen “etxegabe” haien okupazio sinbolikoa. Jatorduan, berriz, menu halako bat prestatu zuten, ekintza hura antolatu zutenek utzitako kanpin-gasez baliaturik.

1978/02/24. Urretxun, **Iberdueroren bulegoak hesi-hormaz itxi zituzten**, Lemoizko zentralaren aurka protesta egiteko.

1978/03/02. **Energia nuklearraren aurkako baraualdia**. Sei lagun itxi ziren Donostiako Andre Maria guztiz Santua Elizan, gose-greba bati ekiteko asmoz. Lemoizko zentrala eraiki behar zutela-eta, ekintzaileen asmoa “herritarrei gertatzen ari zenari buruzko kontzientzia” piztea izan zen. Hilaren 11n eten zuten baraualdia, Trokaraino egin zuten martxaren bezperan, hain zuzen.

1978/03/03. **Autobus bat bahitu zuten**. Gabierrotako eta Orereetako Bizilagunen Batzarrak deituta burutu zuten ekintza hura. Autobus hartan bertan egin zuten manifestazioa, auzoko haurrak buru zirelarik, denek garraiobide publikoez baliatzeko zuten eskubidea aldarrikatu eta autobus-linea gehiago jar zitzaten eskatzeko. Udal-agintariek jaramonik egin ez zietela ikusirik, hiru egunen buruan **beste bi autobus** bahitu zituzten. Nolanahi ere, erakundeek ez zuten txintik ere esan, arazoa ukatuko balute bezala; apirilaren 1ean, langile-auzo haietako bizilagunek **beste zazpi autobus** bahitu zituzten, haiek hurbildu ahala. Errenterian, berriz, lau autobus bahitu zituzten, eta Pasaiara ere joan ziren, beren bidea han bukatzen zuten beste hiru autobusak bahitzeko. Azkenean, bizilagunek beren helburuak lortu zituzten, eta hala, linea-autobus bat jarri zuten ibilbide osoa egiteko.

1978/03/19. **Babcock Wilcox enpresako milaka langilek** Barakaldoko **fabrika okupatu zuten**, beren lan-postuen aldeko manifestazioa egin ostean. **Bi eguneko itxialdia egin zuten, eta familiartekoak ere gehitu zitzaizkien**, fabrikaren **patioan egin ohi zituzten jatorduetara**. Hainbat enpresatan izugarri ugaritu ziren urte haietan bai itxialdiak bai okupazioak.

1978ko maiatza. Gandhiren ikasle Giuseppe Giovanni **Lanza del Vasto** Donostian eta Bilbon izan zen, 77 urte zituela. Arkako Komunitatea sortu

zuen, eta, Larzacen ikasitakoarekin batera, ezin ukatuzko erreferentzia izan zen Euskal Herriko desobedientzia-mugimenduentzat. Arkako Komunitateak indarkeria-eza du oinarri, bai eta nekazaritza ekologikoa ere. Urte batzuk lehenago, Frantziako kideek **zentral nuklear bat okupatu zuten**.[130] Lanza del Vasto Murtzian hil zen, 1981eko urtarrilaren 5ean.

> "Indarkeria-eza ez da pentsamolde bakezale hutsa –esan ohi zuen Lanza del Vastok–, borrokarako arma bat baizik. Indarkeria-ezak ez du esan nahi edozeri baietz esan behar zaionik, edonor bedeinkatu behar dugunik. Borrokan jarduteko era bat da, eta borroka horrek, oroz gaindi, egokia izan behar du. Indarkeria-eza behar bezala erabiltzen ez baduzu, beste metodoek bezalaxe mina eragingo duzu, agian. Beraz, indarkeria-ezak prestakuntza behar du, bai fisikoa bai estrategikoa, baina indarkeriazko metodoek eskatzen duten baino zuhurtzia handiagoz betiere. Indarkeria-ezaz baliatzen den pertsonak indarra behar du, zalantzarik gabe; hala ere, haren indarrak espirituala beharko du batez ere, nahiz indar fisikoa ere premiazkoa izango zaion; ez, ordea, inoren aurka oldartzeko, bere buruari tinko eusteko baizik, hartaz baliatzen denak ikaragarri sufrituko baitu, ziur. Hala, bada, indarkeria-eza gizartea iraultzeko jardunbide bat dela esan daiteke".[131]

1978/05/02. Energia nuklearraren aurkako itxialdia Bizkaiko Foru Aldundian.

1978/06/06. Maiatzaren 22tik greban zeuden Firestone enpresako 300 langileek **Bilbao Bankuko jarduna "ito" zuten, lau orduz leihatilak erabat hartuz**. Ekintza guztiz burutsua izan zen: **langile bakoitzak 100 pezeta inguruko kontu bat ireki zuen, 50 zentimoko edo pezeta bateko txanponak erabiliz**. Hala, leihatilaz leihatila ibili ziren, pezeta bat edo bi kontuan sartuz, beste langile batzuek maileguei buruzko informazioa eskatzen zuten bitartean. Dena den, zergatik aukeratu zuten Bilbao Bankua? Huraxe baitzen Firestone enpresako bost akziodun nagusietako bat. Fatxadan kartel bat jarri zuten: "Bankuek agindu, zuzendaritzak betearazi eta langileok ondorioak ordaintzen ditugu".[132] Handik bi egunera, ekintza bera egin zuten Bizkaia Bankuan, eta ekainaren 19an, berriz, Baneston. Azken hori 500 langilek okupatu zuten, eta inor barrura sartzea galarazi. Langileek goiz osoa eman zuten han, eta haietako bakoitzak kontu bat ireki zuten oso diru gutxirekin. Nolanahi ere, Firestone enpresako langileak ez ziren protesta mota hori egin zuten bakarrak izan, egun haietan bertan ekin baitzioten ekintza mota haiek egiteari Sarrió, Elma eta beste hainbat lekutako langileek.

130 Pepe Beunza *in* "En legítima desobediencia", 51. or.

131 "La no violencia supone tener la fuerza y no utilizarla", *Egin* egunkarian agertutako elkarrizketa, 1978ko maiatzaren 5a, 8. or.

132 1978ko ekainaren 7an agertua *Egin* egunkarian.

1978ko urriaren lehenengo egunak. **Bitartekorik gabeko salmenta zuzena**. Hainbat egunez, Nafarroako nekazari eta langabetuek Erriberan bildutako tomateak saldu zituzten Nafarroan eta Gipuzkoan, haien lana aldarrikatu eta lan-egoera larriaren berri emateko. UAGNren babesaz baliaturik, Langabetuen Mugimendu Batuak sustatu zituen salmenta zuzen haiek, bai eta auzo-lagunen zenbait elkartek nahiz SU sindikatuak ere.

1978/10/08. **Energia nuklearraren aurkako desobedientzia-kanpaina baten berri eman zuten**. Itziarko landetan, zentral nuklear bat egitera zihoazen lekutik oso gertu, milaka lagun bildu ziren. Ekitaldi jendetsu hartan Lemoizko zentral nuklearraren aurkako kanpaina bati hasiera emango ziotela adierazi zuten Energia Nuklearraren aurkako Komiteek eta Energia Nuklearrik gabeko Euskal Kostaldearen aldeko Komisioak. Hura behin betikoa izan ezean, berriz, ozen adierazi zuten bigarren fase bati ekingo ziotela, erresistentzia pasiboaz eta desobedientzia zibilaz baliaturik: argindarraren erreziboa kontuz aldatzea, kuotak ez ordaintzea eta erabateko argi-itzalaldiak egitea; horra zer-nolako ekintzak zituzten haiek gogoan. Itziarren bildurik zeuden pertsonak Endata gainera igo eta han eraiki behar zuten zentralaren hornikuntzak **eraitsi** zituzten.

1978ko urriaren 10etik 15era bitartean. Hainbat lagunek **beren dirua atera zuten aurrezki-kutxetako kontuetatik**. Eusko-Aragoitar Autobidearen bulegoetan itxialdia egiten ari ziren lagunak kaleratu zituen Guardia Zibilak. Hogeita hamarren bat lagunek erresalbuan iraun zuten gau eta egun, enpresaren aurrean, autobidea eraiki behar zutela-eta, agintariek eman zieten kalteordain ziztrinagatik protestatzeko. **Adin guztietako pertsonek justizia eskatu zuten, beren aulki tolesgarrietan eserita**, handik mugitu ere egin gabe. Konponbide bat lortzen zuten arte, aurrezki-kutxetatik beren dirua ateratzea erabaki zuten, behin behineko neurri gisa.

23/10/1978. Merkataritza Ontzidiaren Sindikatu Libreak (SLMM) **gerrako materialak garraiatzera behartzen zien enkarguen aurka boikota egitea erabaki zuen**. Izan ere, material haiek diktadurapean zeuden herrietara bidaltzea eskatzen zitzaien; hala nola, Argentinara, Txilera, Nikaraguara, Hegoafrikara eta Marokora.

1978/10/28. ***...Tanke bat topatu dut nere kafesnean!*** Larzaceko hainbat leku estrategikotan, Frantziako Armadak itzeleko gerra abiarazi zuen, jendea bere onetik ateratzeko. 40 bat tankek maniobrak egin zituzten herritik ehun metro eskasera, eta hainbat jendarme, berriz, itxurazko helbururik gabeko patruilatan ibili ziren. Horri erantzuteko, 1973ko esperientziaz baliatu ziren herritarrak: abenduaren 1ean, **710 kilometroko martxa bat egin zuten**

**oinez, Frantziako Errepublikaren bihotzeraino**; Larzaceko 22 baserritar, 22 "txerri jator" –halaxe esaten baitzioten elkarri–, Parisera heldu ziren, Eliseo Jauregira haien protesta eramateko. Nahiz eta prefektuak argi utzi zuen manifestariei guztiz debekatzen zitzaiela Orleánsgo Atea igarotzea, hainbat taldek beren etxeak eskaini eta babes erabatekoa agertu zieten. Handik denbora gutxira, gauzak aldatu egin ziren: **Nekazarien 90 traktore militarren tiro-eremuaren erdiraino sartu ziren**. Hala, borroka luze baten ostean, 1981ean hautatu berri zuten François Miterrand presidenteak hedapen militarra bertan behera uzteko agindua eman zuen. **Larzac garaile, azkenean ere!**[133] Hurrengo urteetan, Larzac ezin ukatuzko erreferentzia bihurtu zen borrokan jarraitzen zuten ekintzaileentzat. Hantxe sortu zen, 2003ko abuztuan, "Segalari boluntarioak" izeneko ekimena.

1978/12/06. Espainiako Konstituzioa: "Armada lurraldetasunaren jagole"... "Legeak ezarriko ditu betebehar militarrak eta kontzientzia-eragozpena, bai eta nahitaezko soldadutzatik salbuesten dituzten gainerako neurriak ere; haren ordez, gizarte-zerbitzuetan parte hartzea eska dakioke edozein herritarri".[134]

1979/03/10. **Hirurogeita hamar eragozlek martxa bat egin zuten oinez, Santurtzitik Bilboraino ("desde Santurce a Bilbao...")**. Bide osoan zehar kontzientzia-eragozpenari buruzko kartelak eta panpinak erakutsi zituzten. Eragozleentzako estatutu bat eskatzea zen haien helburu nagusia, eta orobat atxilotutako eragozle guztientzako askatasuna aldarrikatzea. Hiru manifestari atxilotu zituzten, baina **gainerako manifestari guztiak polizia-autoaren gainean eseri**, eta libre utzi behar izan zituzten azkenean.

1979/05/01. Maiatzaren 1a Iruñean. Ubarmin Ospitaleko langileek greba egitea erabaki zuten. **Manifestazio bat antolatu eta ospitaleko ohe mordoxka bat kanpora atera zituzten**.

1979/05/11. **Portuetako langileek boikota egin zioten ontzietatik Lemoizera eramatekoak ziren materialak ateratzeari**. Bizkaiko portuetako langileen batzarrak Santurtzin egindako bileran erabakitakoari jarraituz, hainbat langilek uko egin zioten Lemoizera eramatekoak ziren materialak ontzietatik ateratzeari, eta hala, Covadonga bapore-ontziaren zama bere horretan utzi zuten, ontzi barruan zentralerako hainbat pieza zekartzatela-eta; halaxe zen, gainera. Zametako bat, izan ere, New Yorketik bertatik ekarritako 41 tonako pieza astun bat zen. Zereginik ez zeukala ikusirik, bapore-ontzia Bordelera abiatu zen, Westinghouse enpresaren zama han porturatzeko, baina Frantziako

133 http://www.larzac.org/resister/non-violence.php

134 Perico Oliver Olmo: *Op. cit.*

portuetako langileek euskal langileekin elkartasunez jokatzea erabaki zuten, eta han ere boikota egin zioten Covadonga ontziari. Material hari guztiari buruzko kontu gutxi entzun zen ondorengo hilabeteetan; dena dela, geroago jakin ahal izan zenez, Covadongaren arduradunek Noreña III ontzian zamatu omen zituzten pieza guztiak –ordu txikitan, noski–, eta Santanderrera eraman; bi egunen buruan, pieza guztiak porturatu zituzten han, poliziak portuan bildutako manifestariak estu-estu lotzen zituen bitartean. *Diario 16* egunkariaren orrietan irakurri ahal izan zenez, Estatuko Zamaketarien Elkartea "ETAren estrategia terroristaren transmisio-uhala" baizik ez omen zen.[135]

1979/05/23. KEM-MOC taldeko zenbait eragozlek **pertsonaia eta gertaera militarrekin zerikusia zuten Donostiako hainbat kale eta plazaren izenak aldatu zituzten**; haien ordez, behin behineko izen hauek ezarri zizkieten: *Askatasunaren kalea, Presoaren Enparantza, Iheslarien kalea* ("edonolako armadarekin kolaboratzeari uko egin dioten guztien omenez"), eta abar. Antolatzaileek adierazi zutenez, "bataio" hura ez zen izan bizilagunen elkarteari nahiz herri-elkarteei eginiko proposamena baizik. Urte batzuk geroago, ekintza mota bera egin zuten Bilbon, militarren izenak zeramaten plaketan preso zeuden intsumisoena ezarriz.

1979/06/03. Tutera irteerako **errepidean eserialdi baketsua egin zuten**, nazioarteko eguna ospatzen zela-eta, energia nuklearraren aurkako festan parte hartzen ari zirenen kontra poliziak izandako jarrera oldarkorra salatzeko. Zenbait guardia zibilek bertakotuen aurka gogor egin zuten eraso, eta haietako batek armaz jo zion buruan **Gladys del Estal** ekologistari; garondoan jo zion tiroak. Ondorengo egunetan hil zen ekintzaile gaztea. Tiro egin zion guardia zibilari, José Martínez Salasi, 18 hilabeteko kartzela-zigorra jarri zioten.[136] 1992ko urriaren 12an, domina batez saritu zuten Martínez Salas, Armadan egindako merezimenduengatik.[137]

1979/06/22. Ondarroako udalbatzarrak erabateko babesa agertu zien Lemoizko zentrala gerarazteko egiten ari ziren desobedientzia-kanpainei. Horrez gain, udalak **hitz eman zuen Iberdueroren erreziboak helbideratzeari utziko ziola**. Bide horrixe heldu zion Errenteriako udalak ere.

1979/07/27. **Udalak energia nuklearraren aurkakotzat agertu ziren**. Halaxe ageri zen irteeretako nahiz heldulekuetako panel batean. Orduko hartan, Irungo udalbatzarrak adierazi zuen bere burua energia nuklearraren aurkakotzat.

135 Eguzki: *Lemoiz apurtu, 1972-1987...*, Egileen argitalpena, 1987, 39. or.

136 Gladys Gogoan Taldea: *Ez naiz pegata hutsa! Gladys eguzkiarekin maitemindu zenekoa*, Zezengorri-Xirika, Senpere, 2004ko maiatza, 38. or.

137 "Euskal Herria y la Libertad", VIII. Liburukia, *Op. cit*., 163. or.

Antzeko adierazpena berretsi zuen udalbatzarrak 1982ko martxoaren 26an; hantxe egin baitzitzaion uko material erradioaktiboak zeramatzaten garraiobideei herrian sartzen uzteari, bai helburu militarrak zituztenei bai helburu industrialak zituztenei. Udal askok eta askok ekin zioten adierazpen mota horiek egiteari.[138]

1979/08/02. **Gobernadoreari desobeditu zioten**. Gipuzkoako gobernadore zibilak debekatu egin zuen eskuarki Lemoizera zihoan Martxa lurralde horretatik pasatzea, eta poliziak gogor jokatu zuen hainbat herritan; herritar gehienek, ordea, bat egin zuten protestaldiarekin. Honela dakusate kontu hura guztia antolatzaileek: "Gobernadoreak Martxa hura eskuarki debekatu zuen arren, herritarrek ez zioten men egin aginduari eta Martxarekin bat egin zuten; saltzaileek, halaber, debekuari batere jaramonik egiteke, beren salgaiak banatu zituzten; udalerriek, orobat, uko egin zioten agintarien esana betetzeari, eta manifestarien eskura jarri zituzten hainbat eta hainbat lokal; artistek ere berdin jokatu zuten, besteen gisan, eta Martxa babestu zuten. Horixe guztia duzue desobedientzia zibila ekintzetan adierazia". Guardia Zibilaren oztopo eta eragozpen guztiak gorabehera, Ibaizabalgo zutabeak ere bat egin zuen manifestazioarekin; hala, bitan igo ziren trenean, kontrolei bizkarra emateko, eta azkenik abuztuaren 7an iritsi ziren Lemoizera.

1979/08/25-31. KEM-MOC taldeak antimilitaristatzat aitortu zuen bere burua, Arabako Landa herrian egindako I. Kongresuan.[139]

1979/09/09. **Itxialdi andana hainbat fabrikatan**. Gipuzkoan, lehenbizi, eta Bizkaian, ondoren, Ipar Euskal Herriko errefuxiatuei elkartasuna adierazteko; haien eskakizun nagusia euskaldunei errefuxiatu estatusa aitortzea eta Frantziatik ez botatzea izan zen, Batallón Vasco Español taldearen mehatxupean baitzeuden. Zenbait langile-taldek **gose-greba bati ere ekin zioten, nork bere enpresan**, Errenteria eta Pasaia inguruetan batez ere. Itxialdiak irailaren 26an bukatu ziren.

138 1979an, Lekeitioko udalak erabaki zuenez, material erradioaktiboak zeramatzaten garraiobideek ez zuten herrian sartzerik izango; 1983ko uztailaren 15ean, Adunak "Herri Ez Nuklear" bihurtu zuen inguru osoa; Orkoiengo Kontzeju, berriz, "Zona desnukleartu" aldarrikatu zen urriaren 7an; Ibarra, bere aldetik, "zona desnukleartu eta NATOren aurkako"; Villabonan eta Burlatan ildo berari eutsi zioten, hilabete hartako bertako 17an; bi egun geroago, Agurain "udalerri desnukleartu" bihurtu zuten –Arabako Aldundiak errekurtsoa jarri zion–; urriaren 25ean, gauza bera Santurtzin ere; eta berdin, hilaren 15ean, Usurbilen; abenduaren 5ean, Trapagan; abenduaren 11n, Sopelan; hilaren 18an, Anoetan; hilaren 20an, Elgetan. Beste hainbat udaletan ere antzeko adierazpenak egin zituzten: Ordizian, Ataunen, Seguran, Beasainen, Olaberrian, Izurtzan, Otxandion, Barakaldon, Zaldibian, Legorretan, Puion... 1983ko urriaren 10ean, Orkoiengo Kontzejuaren Batzarrak aho batez onartu zuen lehen ere esana zutena: energia nuklearrik gabeko herri zela beraiena, alegia. Hilabete hartan bertan, gauza bera egin zuten Hernanin, Berriozaren, Tuteran eta beste hainbat herritan. 1984an Gorlizek hartu zuen txanda. 1986ko urriaren 20an, berriz, Bilbo energia nuklearrik gabeko hiri aitortu zen, eta geroago, Zaratamok eta Gernikak aldarrikapen bera egin zuten.

139 Pedro Oliver eta David Gª Aristegui. MOC elkarteko Lavapiéseko kideak: "Antimilitarismo en tiempos de barbarie", *in* "Libre Pensamiento", 49. alea, 2005eko udazkena, 44. or. Ikus, halaber: R. Ajangiz, C. Manzanos eta J. Pascual: *Objetores, insumisos*, Eusko Jaurlaritzaren argitalpena, 1991ko otsaila, 51-58. or.

1979/10/07. **Iberdueroren ehorzketa zibila**. Parodia egin zuten Iruñeko Txantrean.

1979/10/10. **Mozioak udaletan**. Energia Nuklearrik gabeko Euskal Kostaldearen aldeko Komisioak eta Komite Antimilitaristek mozio bat aurkeztu zuten, eta hura Euskal Herriko hainbat udalek onartu zuten. Hona hemen mozio hark zer eskatzen zuen nagusiki: Lemoiz geraraztea, Bermeoko gatazketan parte hartzea, aurrezki-kutxek Iberduerori maileguak etetea, erreziborik ez ordaintzea, herri bakoitzean material erradioaktiboak zeramaten garraiobideei sarrera galaraztea, eta orduan bertan sortu zuten Lemoizen aurkako Hautetsien Batzarrari erabateko babesa agertzea.[140] Kontuak kontu, gertaera hark onarpen historikoak ekarri zituen; bereziki esanguratsua izan zen 1980ko maiatzaren 31n Tafallako udalbatzarrak aho batez onartu zuena: Lemoiz behin betiko ixtea, alegia. Mozio hura udaleko alderdi guztiek onartu zuten: UCDk, Alderdi Popularrak, PSOEk eta EAJ-PNVk. Nolanahi ere, gobernu zibilek akordio horietako asko ezeztatu zuten 1979 eta 1982 artean.[141]

1979ko urria. **Iberduerori boikota nola egin azaltzen zuten esku-orriak banatu zituzten**. Ordura arte emandako gomendioez gainera (erreziboak ez ordaintzea nahiz kobratzaileari aterik ez irekitzea), Energia Nuklearraren aurkako Komiteek argindarra berriz nola jarri azaltzen zien herritarrei esku-orrietan, baldin Iberduerok hura mozten bazien. Hala, grafiko bat osatu zuten, eta elektrikari talde bat jarri zieten eskura erreziboa ordaindu ez zutenei. Beste hainbat ekimen ere abiarazi zituzten; esate baterako: Iberdueroren bulegoetako telefonogunea eteteko adina telefono-dei egitea, edota bulegoetan itxialdiak egitea. Honela azaldu zuten beren asmoa:

> "Poliziak eta telebistak babesten dute Iberduero; baina hori gutxi balitz bezala, behar-beharrekoak zaizkio, halaber, gure isolamendu eta izua. Aski litzateke Lemoizen aurka gaudenok Iberduerorekin kolaboratzeari utziko bagenio.".[142]

1979/11/22. **Argiak itzali zituzten denek ordu berean**. Orduko hartan, Deba ibarrean egin zuten protestaldia. Hurrengo astean, ordea, hilaren 29an, Lea-Artibai inguruan burutu zuten ekintza. 1980ko otsailaren 22an, berriz, Hernanitik Tolosara doan bailaran. Euskal Herri osoan deitutako lehen argi-itzalaldia 1980ko ekainaren 3an egin zuten, Guardia Zibilak Gladys

140 Hautetsien I. Batzarra Mungian egin zuten abenduaren 9an, eta 115 hautetsik eta 55 udalek parte hartu zuten han. 1980ko martxoaren 23an Bizkaiko Aldundian egin zuten II. Batzarrean, berriz, 101 udaletako 233 hautetsik parte hartu zuten, bai eta hainbat parlamentariok eta diputatuk ere.

141 Eguzki: *Op. cit.*, 56. or. eta hurr.

142 Euskadiko Energia Nuklearraren aurkako Komiteek postontziz postontzi banatu zituzten 100.000 diptiko.

del Estal hil zuela gogoratzeko: bost minutu iraun zuen, hamarrak eta erdietan hasita. Erantzun itzelekoa, zalantzarik gabe. Itzalaldiarekin batera, gainera, beste hainbat ekimen ere egin zituzten: eltzealdiak, kanpaikadak, autoak klaxona joaz, eta abar. 1981eko azaroaren 9an beste argi-itzalaldi bat egin zuten Errenterian, eta gero, atzera ere, euskal herritar guztiei egin zitzaien dei, den-denek argiak itzal zitzaten; hala, bada, 1982ko otsailaren 5ean, "**Energia Nuklearraren aurkako II. Itzalaldi eta Burrundara Orokorra**" izeneko ekimena egin zuten Euskal Herri osoan. Jende asko irten zen balkoietara, itzalaldiak zirauen bitartean hainbat eltze eta lapiko dardarazteko.

1979ko abendua. **Sorgiñe Irratia.** Iruñean hasi zituen emanaldiak irrati libre horrek, nahiz eta 1980ko maiatzetik aurrera baino ez zen hasi etengabeko irratsaioak ematen. Haren sustatzaileek Bartzelonan egin zuten Irrati Libreen I. Kongresuan egon ziren, eta han ezagutu zituzten hainbat lagunek eskuratu zizkieten emititzen hasteko beharrezkoak zitzaizkien igorleak eta bestelako gailuak, bai eta proiektua burutu nahi bazuten, premiazkoak zitzaizkien bitarteko teknikoak ere: "Burua zabal-zabalik dugu, mota guztietako iradokizunak, lanak, kritikak, eta, oro har, informazio zuzen, ireki eta objektiboa lortzen lagunduko digun edonoren gomendioak jasotzeko. **Gure arazo nagusia da Ministerioaren diru-laguntzarik ez dugula oraindik jaso: KGBk ez du sosik eman, eta CIA, berriz, txakur txikirik gabe dago**. Labur beharrez: ez dago dirurik". Haien goiburua ere argi askoa zen, horratik: "Zilbor zoriontsurik ez!". Mitoak hausteari ekin nahi izan zion irrati hark. **Furgoneta batean zuten irratiaren emisorea**, baina Guardia Zibilak berehala eten zien hasitako bidea, eta hala, irratia itxi behar izan zuten urte hartako uztailaren 18an (a zer eguna, arraioa!).[143]

### *80ko hamarkada*

1980. **Burdin hesi-8 Ekintza.** Hamar lagun –horien artean, besteak beste, Berrigan anaiak– Pennsylvaniako General Electric enpresaren armategian sartu ziren. Armarik gabe, segurtasuneko agenteak saihetsi zituzten, harik eta segurtasun-eremura iritsi eta **kontinente-arteko 12-A kohete baten burua suntsitzeari ekin zioten arte**. Ekipoaren **plano eta piezen gainera odola isuri zuten**; horrela jardun zuten, atxilotu eta espetxera eraman zituzten arte. Hainbat delitu leporatu zizkieten: baimenik gabe eta legez kontra sartzea,

143 Radio Paraíso eta Satorra etorri ziren jarraian; lehenago, berriz, Osina irratia aritu zen lanean; eta gero, CRDI, Iris, Mozollo, Ganbara, Gramola, Lizarra, Xorroxin, Eguzki Irratia... eta beste mordoxka bat ere bai.

konspirazio kriminala, sedizioa, legez kontrako zalaparta, lapurreta eta indarpeko portaera.[144]

1980/01/03. Indarkeriaz baliatu ez zen talde batek **barauldi bati heldu zion hiru egunez, kalean,** Donostiako Iberduero enpresaren bulego nagusien aurrean. Pankarta bat ere bazeramaten, eta honela zioen: “Bizitzaren alde; heriotzaren aurka”.

1980/03/15. **Adierazpen-askatasunaren alde**. Azken bolada hartan liburu asko eta asko debekatu eta bahitu zituen espainiar zentsurak; horri aurre egiteko, argitaratzaileek nahiz liburu-saltzaileek d**ebekatutako liburuen erakustazoka eta salmenta publiko bat antolatu zuten** Donostian.

1980/03/23. **Argindarraren erreziborik ez zuten ordaindu**. Argindarraren erreziboa ordaintzeari utzi zioten pertsonei –den-denak, noski, energia nuklearraren aurkakoak– beste 171 hautetsi eta hainbat udalbatzar gehitu zitzaizkien. Hala, denek erabaki zuten Iberdueroren erreziboa ordaintzeari uztea. Maiatzaren 13an, mehatxu egin zioten Mungiako Udalari, argindar publikoa moztuko zutela. Gauza bera gertatu zen, orobat, Zizurkilgo Udalean, apirilaren 19an. Udaletako langileek kontagailuak kendu zituzten etxebizitza partikularretatik nahiz herri-elkarteetatik, eta gero, energia nuklearraren aukako argiketariek metroka kable moztu ahala, kableak lotu zituzten; bai etxeetakoak, bai atari zein patioetakoak, den-denak mozturik eta loturik. Horixe bera egin zuten Santutxuko Famili Elkartean, maiatzaren 7an. Energia nuklearraren aurkako komiteetako hainbat kideren etxeetan, adibidez, 16 bat metro kable moztu zituzten. 1980ko uztailaren 9an jakin zenez, Donostiako familia bati zazpi aldiz moztu zioten argindarra. Hainbat hautetsik ageri-agerian kendu zioten hertsapena kontagailuari eta argindarra itzuli zioten familia hari. Gogo-gogoan itsatsirik dugu, halaber, Santi Brouard pediatrak Bilboko bere kontsultan kanpin-gasezko lanpara batekin lan egin behar izan zueneko maiatzaren 31ko argazki hura (bi urte eskas geroago GALko pistoladunek hil zuteneko kontsulta bera, alegia). Espainiako gobernuko funtzionarioek hainbat gauza eraman zituzten Brouarden etxetik, ordain gisa.

1980ko udaberria. **Lakabe.** Pertsona talde batek utzita eta birrinduta zegoen **Nafarroako herrixka hura okupatu zuten**. Partaideen artean zeuden, tartean, Bakearen Etxea historiko haren sortzaileak, bai eta beste hainbat kontzientzia-eragozle ere. Gaur egun 31 lagun bizi dira komunitatean. Baratzean lan egiteaz gain, ganadua ere badute, eta ogia egiten dute egunero, bai bertan jateko, bai kanpoan saltzeko (horixe da, hain zuzen, taldearen

144 Petra K. Kelly: *Op. cit.*, 42. or. Aipamen hau egiten du: Dorothee Sôlle: *El rearme mata ya sin guerra*.

diru-iturri nagusia). Gaur egun ere beren espazioa eraikitzen dihardute. Herria nolabaiteko **eskola herrikoia** ere bada, bertako errekurtsoak bertan ustiatzeaz arduratzen direlarik. Lakaben ehunka topaketa eta ekimen egin dituzte; indarkeria-ezazko entrenamenduak, adibidez; beren egitekoa gizarte osoari eskaintzeko gogoak lehengoan jarraitzen du orain ere.

1980/04/25. **Energia nuklearraren aurkako itxialdiak hainbat instituziotan**. Hautetsiek babesturik, Gipuzkoako Aldundian itxitakoek langileen atxikimendua lortzeko ahalegina egin zuten; hala, haiekiko elkartasunez, langileek greba antolatu eta agiri bat idatzi zuten, etenaldia eta erreferenduma eskatzeko. Egoitzaren kanpoko balkoian pankarta bat ipini zuten, eta han idatzirik: “Desobedientzia zibila”. Hainbat itxialdi egin zituzten gero ere instituzioetan; askotan, berrogeita hamarren bat udaletxe okupatu zituzten aldi berean. Bizkaiko Aldundian egin zuten itxialdietako batean, maiatzaren 24an, 22 hautetsi atxilotu zituzten.

**Beste hainbat ekimen Lemoiz gerarazteko.** Orain arte aipatutakoez gain, beste hainbat ekintza ere egin zituzten; denek ere jokamolde aldaketa halako bat ekarri zuten, frankismo garaian eta trantsizio garaian erabilitako metodo klasikoekiko:

> ...energia nuklearraren aurkako ekintza ugari herri bakoitzean eta eskoletan; antzerki-taldeen eta mimoen parodiak; horma margotu ikusgarriak eta milaka graffiti, kartel eta pankarta; sinadura-biltze ugari eta hainbat iritzi-aldatze; bizikleta itzuliak; informazio-bilerak eta panfleto banaketak, mozorro eta guzti; nazioarteko topaketak; Iberdueroren bulegoen okupazioa; eserialdiak; egunkari erraldoiak; irakasgai bereziak irakaskuntzan; enpresetako delegatuen batzarrak eta enpresa-komiteen iritzi-emateak; lan-uzteak; arrantzontzien elkarretaratzeak Lemoizko kostaldean; alderdi politikoen arteko eztabaidak; hainbat sabotaje, bai eta zentral nuklearraren barruan ere; mota guztietako musika-emanaldiak; zinema-maratoiak eta herritarren zine-forum ekologistak; kanpaldiak; kateatzeak; askotariko erakusketak; hainbat eta hainbat argitalpen: liburuak, aldizkariak, komikiak, eta abar; zentralaren maketak sinbolikoki erretzea. Horrez gain, energia nuklearraren aurkako sinboloak banatu zituzten –eguzki irribarretsu bat ageri zuten pegatinak batez ere–, Euskal Herriko hainbat tokitan ez ezik, baita beste leku askotan ere: Bizkaiko Arboladiko harrobian margotu zituzten 18 metro diametroko eguzkitik Everest gainean margotutakora. Lemoizko gatazka hura indarkeriazko gertaera hutsera makurtu nahi duenak zail luke, horratik!

1980/04/26. **“Eskola Liburu Gorria”**. 1979ko daniar jatorrizkoaren ostean,[145] 10 urtetik 16 urtera bitarteko ikasleentzako liburu hau Europan eta Amerikan banatu zuten. Utopia Argitaletxeak atera zuen Katalunian. Dena dela, zentsurak zorrotz begiratu zion: argitaletxeari isuna jarri zioten, eta liburua bahitu, espainiar eskuineko gizon potoloak “aztoratzeagatik”. Gero, Nuestra Cultura Argitaletxea ere ahalegindu zen hura argitaratzen. Baina zentsurak, atzera ere, ez zion begi onez begiratu liburuaren argitalpenari. Hala, bada, zenbait argitalpen pirata egin zituzten. 1980ko hartan, adibidez, *Egin* egunkariak liburuaren lehenbiziko kapitulua argitaratu zuen, nahiz epaileen aginduz ale hura bahiturik geratu zen. Debeku andanak edizio klandestinoa eskuz esku ibiltzea eragin zuen.

1980/05/03. Milaka pertsona bildu zituen manifestazioaren ostean, Alemaniako energia nuklearraren aurkako mugimenduak **Wendland**eko Errepublika Librea eratzeko saiakera egin zuen. **Gune hori** Gorlebeneko “zakarrontzi nuklearra” egin nahi zuten **lur-sail okupatuan** eraikitzea zen haien asmoa. **Karpaz eta zurezko etxolaz osaturiko herri gisako bat egin zuten han, eta independentzia aldarrikatzearekin bat, pasaporteak banatu zituzten kideen artean**. Hainbat zerbitzu ematen zen gune hartan: jangelak, okindegia, batzar-aretoa, energia sortzea helburu zuen haize-errota erraldoi bat, ur-ahoak, baratzea eta berogailua, haurrentzako parkea eta zabuak, oiloentzako ukuiluak, eta beste hainbat. Ehunka aktibista eta herritarrek era baketsuan aurre egin zieten hara joandako milaka poliziei. Matxinoak banan bana atera behar izan zituzten handik; helikopteroz, tankez nahiz zaldi gainean atera ere. Hilabete iraun zuen kanpaldi komunitario hark, baina erreferentzia ezinbesteko bihurtu zen ondorengo mugimendu alternatibo, autonomo eta berdeentzat.[146]

1980/05/30. Energia nuklearraren aurkako manifestazioa Bilbon. Milaka pertsonak adierazi zioten babesa martxa hari, eta honela zioen pankartaren atzean bildu ziren denak: “Helburu bakar bat: Lemoiz gerarazteа. Bitarteko bakar bat: **Desobedientzia zibila**”.

1980ko azaroaren 8 eta 9. Bilboko Erakustazokan **Herrikoi Topaketak** izenekoak egin zituzten. Defentsa Komisioak eta Energia Nuklearraren

145 Soren Jansen eta Jesper Jensen holandarrek idatzi zuten lan polit hori; aurkezpenean diotenez, “ekintzarako gida bat da hau; horixe duzue liburuaren merezimendurik nabarmenena (...) eskoletan lortzen duzuen aldaketa txiki bakoitzak egoki bezain zorrotz eragingo dio gizarteari. Eta gizartean lortzen duzuen aldaketa txiki bakoitzak, bere aldetik, ezinbestez eragingo dio eskolari”. Romeu marrazkilariak liburuko pasarte bat ilustratu zuen: hiru ikasle matxino bata bestearen gainean ageri dira mantal bakarraz jantzirik. Irakaslearengana doazelarik, hiru haurrek desafio egiten diote maisuari. Aipamen guztien berri jakin nahi izanez gero, ikus hemen: *Punto y Hora* aldizkaria, 1980ko otsailaren 21etik 28ra, 29-31. or.

146 *Burchhard Kretschmann in Selbstverlag*. “Gorleben”, Frankfurt, 1980. Fotodokumentazio liburua.

aurkako Komiteek deituta, **euskal kulturaren 702 ordezkarik jardun zuten aldi bereko hainbat emanalditan**: idazleak, bertsolariak, kantari zein musika-taldeak (disko bat ere grabatu zuten zuzenean); 21 antzerki-talde (guztira, 120 artista); 98 eskultore, margolari eta eskulangile; aktoreak nahiz zinema-zuzendariak (bi egunez 52 film eman zituzten). “Euskal kulturgileen eta artisten Manifestua” aurkeztu zuten orduko hartan han bildu zirenek, Lemoiz gerarazteko eta zentral nuklearrean uraniorik ez sartzeko eskatuz. Orotara, 83 pertsona ospetsuk sinatu zuten agiri hura.

1980/11/29. **Lehenbiziko Korrika**, Oñatitik Bilbora. Euskararen aldeko lasterraldi ezagunak milaka lagun bildu zituen lehenengo aldi hartan. Hamar bat egunez, lekukoa elkarri eman zioten egunero, Euskal Herri osoa alderik alde zeharkatu zutenek. AEK-k antolaturik, bi urtez behin ospatzen da festa handi hori, eta 1980tik hona 16 Korrika izan dira.[147]

1980/12/09. **EAJko alkateek greba egin zuten**, Adolfo Suárez Espainiako presidenteak Euskal Herrira egindako bisitagatik.[148]

1981. Arma nuklearrak han biltzea aurreikusita zeukatelarik, **Greenham Common** gune militarraren atarian **hainbat emakumek kanpaldia egin zuten**. 19 urte iraun zuen herri-protestaldi hark, ez gehiago, ez gutxiago; eta, jakina, hura erreferentzia bihurtu zen misilen aurkako nazioarteko mugimendu guztientzat. Ordutik, ekinbide bakezaleari buruz Britainia Handian nagusi zen ikusmoldea errotik aldatu zen.

1981/05/07. **Eskolak kaleetan**. Hernaniko Institutuko irakasleek eskolak eman zituzten herriko plazan, zuzendaritza-taldeak eta Hezkuntza Saileko ikuskariak ikastegia ixtea erabaki zutela ikusirik. Hura ixteko, arrazoi hau eman zuten: batetik, “eskola-egutegia bete ez izana”; bestetik, berriz, irakaskuntza esparruko energia nuklearraren aurkako kanpainan parte hartu izana.

1981/06/09. **Eguzki irribarretsua**, Lemoizko erreaktore nuklearraren goienean. Bost metroko “eguzki antinuklearra” jarri zuten zentral nuklearreko erreaktoreetako baten kupulan. Energia nuklearraren aurkako hainbat kontratupeko langileren ekarpena izan zen orduko hartan egindako ekintza hura.

1981eko abuztua. Arga ibaian, **lehenbiziko ibai-jaiste ekologista** egin zuten. Hurrengo urtean gauza bera egin zuten Urumean, eta gero ere berdin jarraitu zuten Euskal Herriko ibai gehienetan. Eskakizunak, irudimena eta

147 Korrikaren helburu nagusia herritarrei kontzientzia harraraztea izan da, bai euskara sustatzeko, bai lan hori egiteko propio eratutako ikastegiak finantzatzeko. Partaideek eskuz esku doan lekuko bat daramate. Lekuko horrek bukaeran baizik irakurtzen ez duten mezu bat du barruan. Esan gabe doa, noski, euskararen aldeko festarik garrantzitsuetako bat bihurtu dela Korrika, jende samalda batzen baitzaio hura ospatzen denero. Informazio gehiagorako, ikus hemen: http://www.korrika.org/

148 “Euskadi 1977-1982”, *Egin* egunkaria, 98. or.

festa batu zituzten ibaietan behera jaitsi ziren txalupek eta era guztietako ontziek.

1981/09/07. Otsagabiako dantzariek **uko egin zioten militarren aurrean dantza egiteari**.

1981/10/04. **Herri-kanpaldia Belaguan**, paraje haietan **eraikitzekoak ziren gune militar baten aurka protesta egiteko**. Giro itogarria, han bildutako polizien eta militarren ondorioz.

1982. Indarkeria-ezazko hainbat mugimenduk sustaturik –besteak beste, Arkako Komunitateak–, ***Artesanos de Paz*** izeneko taldeak **ordu erdiko isiluneak egiten zituen** Hego Euskal Herriko lau hiriburuetan. Ostegunero, arratsaldeko zazpietatik zazpiak eta erdira, gizartea astintzen duten edonolako indarkeriaren aurka bildu ziren ekintzaile haiek. Euskal Herriko gatazkarekin zerikusia zuen indarkeriaren aurkako protestaldia ez ezik, beste zenbait indarkeria-molderen aurkako elkarretaratzeak ere baziren haiek; esate baterako, armen ugaritzearen aurkakoak nahiz NATO erakundean sartzearen aurkakoak. Isiluneez gain, baraualdiak ere egin zituzten, esate baterako Espainia NATOn sartzera zihoala salatzeko eta Derrigorrezko Soldadutzari aurre egiteko.

1982/02/19. **Istripu nuklear simulakro bat egin zuten**. Iruñeko Gaztelu Plazan egin zuten itxura hura. Lemoizko zentral nuklearraren maketa ezin hobe bat diseinatu eta plazaren kioskoan jarri zuten, behar bezalako hornidura eta guzti. Simulakroaren aurretik, inaugurazio hantuste bat ere egin zuten, suziri eta halakoez baliaturik. Dena dela, itxura hark uste baino denbora gutxiago iraun zuen, Segurtasun Indarrak zalapartaka sartu baitziren plazan; hura ez zen, ez, txantxetakoa izan, bertaratuak ostikoka desegin baitzituzten.

1982/03/28. 40 minutuz –horixe baitirau Polonian 19.30eko gaueko albistegiak– milaka herritarrek argiak itzali zituzten, eta kalean familiekin edo txakurrekin paseatu ziren albistegia amaitu zen arte, hari militarista izatea egotzirik. Beste herritar batzuek, berriz, **beren telebistak leihora atera zituzten, pantaila kalera begira**. Petra Kellyk honela diosku: “agintari militarrek ez zekiten zer egin, poloniarren erresistentziazko ekintza horiei aurre egiteko; izan ere, haien aurka gauza gutxi egin zitekeen tankeekin eta halakoekin”.[149]

1982ko martxoaren 1etik apirilaren 25era. **Lemoizko zentral nuklearraren sarreran bertan bakearen aldeko kartelak jarri zituzten**. 4 orduz, 20

149 Petra K. Kelly: *Op. cit*., 41. or. *Der Spiegel* egunkaria aipatzen du hark albistearen iturritzat. Ikus, halaber: Petra Kelly, Vicenç Fisas (eta beste): “Desarme y Desobediencia civil”, Ecotopía, Tenerife, 1984, 49. eta 50. or.

kartel inguru jarri zituzten zentralaren ate aurrean, indarkeria-ezaren filosofiari jarraituz betiere. Hura antolatu zuen taldeko kide gehienak Lakabekoak dira, eta Armintzan jarri ziren. Une gogorrak bizi izan zituzten, hainbat aldiz atxilotu baitzituen Guardia Zibilak. Autoz haiek harrapatzen ere saiatu ziren, antza. Martxoaren 8ko festan, hiru emakumek parte hartu zuten zentral nuklearreko kartel-aldian. Apirilaren 25ean, amaiera gisa, ehunen bat lagun martxan abiatu ziren, den-denak herrestan, zentralaren ateetaraino, han zegoen Armintzako taldeari babes osoa agertzeko. Tentsioa erabatekoa izan zen, ez ziren-eta gutxi han bildurik zeuden poliziak.

1982/04723. Gaur egun Gasteizko SOS Arrazakeria elkarteko bozemaile den Fede García sindikalistak **txerri bat eman zuen ordainetan**, Bilboko Aurrezki Kutxa Munizipaleko (CAMB) **mailegu bat ordaintzeko**. Aurrezkikutxak 150.000 pezetako zorragatik bere aitaginarrebaren ondasunak bahitu zituela-eta, ekintza xelebre hori egitea otu zitzaion Fede Garcíari; hala, bada, hantxe agertu zen, lau hankako animalia ordain-sari gisa zeramala. Lau ziren, halaber, han sartzen utzi ez zioten segurtasuneko zaintzaileak. Halabeharrez, agian, itxi arte García langile izan zuen Sagarduy enpresako akzioduna zen Bilboko Aurrezki Kutxa Munizipala.

1982/09/17. Greenpeace taldeko boluntario bat Chedolborg itsasontzi holandarreko **garabian gora igo zen**; beste boluntario bat ere saiatu zen hara igotzen, baina **zabor erradioaktiboz betetako bidoi batek haren ontzia jo, eta larriki zauritu zen**. Zabor haiek guztiak Atlantikoko sakongunean isuri nahi zituzten, 3.000 bat metro itsas hondora eta Galiziako kostaldetik 630 metrora. Boluntario ekologistek, ordea, hura galarazi nahi zuten, kosta ahala kosta. Ekintzailea estu lotu zitzaiolarik, garabiak ez zuen jada balio bidoiak itsasora botatzeko. Hala, bada, Sirius itsasontzi ekologistaren txalupek garaipen itzela lortu zuten orduko hartan[150], nahiz egia ere baden borroka hura ez zela inondik ere berdinen artekoa izan. Ez zen hura izan ekintzaileei bidoi bat gainera erori zitzaien lehenengo aldia; 1978an, izan ere, Gem ontzi britainiarraren bidoi batek Rainbow Warrior ontziaren txalupa bat zapaldu zuen. Itsasora isuri daitezkeen zabor erradioaktiboen gaineko luzamendua behin-betiko onartu zuten 1985ean.

150 Jesús Portela: “*Polo mar abaixo vai...* un bidón radiactivo”. “*El Faro de Vigo* egunkariaren zuzendari-ordeak 2007ko uztailaren 30ean kontatzen zuenez, bera ere saiatu omen zen, beste hainbat kazetarirekin batera, bidoi erradioaktiboak itsasora bota zitzaten galarazten. Hala, Pleamar eta Arousa III itsasontzi galegoetan sartu eta Sirius ontziarekin bat egin zuten. Honela diosku: «Talde ekologistako kideek ontzi holandarraren alboetan egitera zihoazen ekintza arriskutsu haiek ikustera gonbidatu gintuzten. Txandaka, Vigoko ontzietan gindoazenak Greenpeaceren txalupetara igo ginen, eta ontzi holandarreko garabia zegoen tokira iritsi, itsasora bidoiak bota zitzaten kosta ahala kosta galarazteko. Bidoien azpian larri-larri eusten zioten ekintzaileek, ontzi-kideek presiopeko ura botatzen baitzieten gelditu gabe. Dena dela, hainbat ekintzailek garabian gora igotzea lortu zuten, eta hari loturik, bidoiak bota ezinean geratu zen ontzia».

1983. urtetik 1986. urtera bitartean. Hainbat herritarrek **ETBren seinalea legez kanpo harrapatzeko antenak eta hegagailuak instalatu zituzten**. Nafarroako gobernuak hartarako eskubidea ukatu arren, hainbat herri-ekimen sortu ziren, legez kanpoko instalazioak eraikitzeko. Altsasun, adibidez, auzolanean jardun zuten; 500 pezetako txartelak atera zituzten, eta lortu ere lortu zuten antena bat jartzea. Gauza berari ekin zioten Iruñea inguruan ere, eta handik hiru urtera, berriz, Tuteran. Azken herri horretan Beterri Peña aritu zen lanean antena jartzeko; hasieran, haize-energiaz baliatu ziren; eta ondoren, eguzki-xafla batzuez. Ipar Euskal Herrian ere beste berrogei ekimen inguru izan ziren emisioa harrapatzeko, legez kanpokoak den-denak.

1983/02/27. **Pertsona ugari joan zen** Pasaiako Jaizkibel mendian zegoen **kanpamendu militarrera**, han zeuden militar eta buruzagiei **arbuioa adierazteko**. Herritarrek mezu argi hau adierazi zieten hango militarrei: “zuek hemen egoteak mehatxu egiten digu guztioi, zuen helburua guretzat hil ala biziko den birika hau okupatzea baita”.

1983ko apirilaren 2 eta 3. Europako hainbat lekutan **gune militarrak oztopatu zituzten**. Alemania Federalean, Italian eta Erresuma Batuan milaka bakezalek egindako ekintzak zeharo nabarmenak izan ziren. Glasgowen, adibidez, **istripu nuklear simulakro bat** antzeztu zuten. Kalkulu batzuen arabera, milioi erdi lagun inguru bildu ziren Alemanian. Hilaren 4an, **Bakearen aldeko Martxa** bat abiarazi zuten Basilean.

1983/05/23. **Kanpaldia Donostia erdi-erdian**. *La Voz de España* egunkariaren lokaletatik bota zituztelarik, gazte-taldeek ez zioten utzi “Gazteen Etxe” bat eskatzeari. Gaur egungo gaztetxeen aurrekaria izan zen hura, ezbairik gabe. Halaxe, gazteek planto egin zuten beren kanpin-dendetan.

1983/05/29. **“Arma-lasterketa” Gasteizen**. Espainiako Armadaren Eguna ospatzen zela-eta, talde antimilitaristek parodia bat egin zuten, festa-giro apartean.

1983ko udazkena. NATOren aurkako kanpainek hainbat aurrekari izan zituzten; hala nola, **“Udazkena 83”**, **“Udaberria 84”** eta **“Udazkena 85”** zeritzotenak. Euskal Herriko herri gehienetan burutu zituzten ekimen haiek, den-denetan egon ohi baitziren egun haietan nola-halako ekintza antimilitaristak: NATOren aurkako ekitaldiak, Euskal Herriko subiranotasunaren aldekoak, kultura esparrukoak, festak, literatura-saioak, kale-giroko ekitaldiak, zirikatzea helburu zutenak, eta abar. Guk dakigula, aldiz, NATOren aldeko kanpainarik ez zuen inortxok ere antolatu.

1983/10/22. 200.000 pertsona inguruk parte hartu zuten **historiako giza kate handienean –108 kilometro, hain zuzen**–, Bonnen, Alemania Federalean. Ondoren jarraitu zitzaion manifestazio erraldoian, berriz, **hainbat soldadu uniformedun egon ziren**, Cruise eta Pershing misilen aurkako **pankarta bat zeramatela**. Milaka eta milaka lagunek arbuio sendoa adierazi zioten NATOren euromisilek ezinbestez ekarritako berrarmatze nuklearrari; halaxe  egin zuten Europa osoan zehar egin zituzten manifestazioetan: Londreskoan, Erromakoan, Vienakoan, Madrilekoan, eta beste hainbat hiritakoan. Euskal Herrian, berriz, Tuteran egin zuten NATOren aurkako protesta nagusia, hilaren 23an.

1983/11/20. Bilbon, **kartoizko misil batek** ireki zuen **NATOren, gune militarren eta euromisilen aurkako manifestazioa**; halaxe eman zitzaion amaiera "Udazkena 83" kanpainari. Manifestazioa bake-bakean eta istilurik gabe egiten ari ziren arren, Segurtasun Indarrek itzeleko karga bat egin zuten; horren ondorioz, berrogeita hamarren bat zauritu izan ziren (haietako batek ikusmena galdu zuen, eta kazetari bati, berriz, saihetsak hautsi zizkioten). Hainbat talde bakezale **elkarri lotu zitzaizkien**, **eskuak jasota,** indarkeria-eza adierazi nahirik bezala; baina poliziek, gomazko pilotak eta borrak baizik ez baitituzte ezagutzen, manifestariak jipoitzeari utzi gabe jarraitu zuten.

1984. Europako esne-ekoizle handien gainprodukzioaren ondorioz, ekoizle txikiek nabarmen jaitsi behar izan zuten esne-ekoizpena. Hala, behi-esneari jarri zioten kuotaren aurka protestatzeko, **Euskal Herriko Laborarien Batasuna (ELB) sindikatuko 130 sindikalistak beren hileroko gizarte-kotizazioa urtebetez gutxitzea erabaki zuten**. Ekintza hura modu aski pedagogikoan azaldu zuten laborariek: legea betetzearen aurkako neurria izan arren, haientzat guztiz bidezkoa zen hala jokatzea. Nekazarien Gizarte Mutualitateak mehatxu egin zien, zenbait eskubide kenduko zizkiela; baina desobedientziazko ekintza hura oso izan zen lagungarria kuotei eusteko borroka hartan.

1984/01/27. 78 urteko Martina Maritonea bere etxetik bota zuten, 44 urte maizter egon ondoren. Hura kaleratu eta gutxira, **Gaztelu Plazan jarri zen kanpin-denda batean, eta haraxe eraman zituen bere gauza guztiak**, gertaera haren aurka protesta egiteko. Otsailaren 2an, udaltzainek kanpin-denda eraitsi zuten.

1984/03/11. Beste urte batzuetan egindakoari jarraituz, gazteen garaiera neurtzeko saioa bertan behera utzi behar izan zuten, **hartarako beharrezkoa zen tresneria lapurtu zutelako**. Beste hainbat lokaletan, berriz, bezperan

baliogabetu zuten saioa, edo egunean bertan atzeratu, sarrailak silikonaz estalita agertu zirela-eta.

1984/04/13. Landako Langileen Sindikatuak (SOC) Maileguen Espainiako Bankua jabe zuen **finka bat okupatu zuen** Jerezen. Hurrengo egunean bertan kaleratu zituzten sindikalistak, andaluziar peoiek burututako beste hainbat ekintzekin gertatutakoaren antzera. 2005eko Maiatzaren 1aren Egunean, adibidez, bi mila jornalarik Osunako La Turquila finka okupatu zuten, SOCek horretara deiturik. Espainiako Defentsa Ministerioarena zen etxetzar hura, eta haren errentagarritasun soziala aldarrikatzea zuten helburu okupatzaileek.

1984/06/08. **Madrileko Armadaren Museoan sartu eta Intxarkundia batailoiaren ikurrina eraman zuen. "Etsaiari ebatsitako Garaikurrak" izeneko sailean zegoen bandera**. Balentria haren egilea Joseba Elosegi jelkidea izan zen, Francoren aurrean bere buruari su eman zion gudari zaharra. Hark emana da azaña haren azalpen hau: "Bandera konstituzional bat etsaiari ebatsitako garaikurtzat hartzea guztiz zentzugabea iruditzen zitzaidan". Epaitu egin zuten gertaera hargatik.

1984/06/22. Hernaniko Industrias Químicas del Urumea enpresan giza kate itzelekoa osatu ostean, **haren hodiek botatako ura ontzietan bildu eta errekaren goialdean utzi zuten, hantxe baitzegoen enpresaren urhartzea**. Ekologistek era pedagogikoan adierazi nahi izan zutenez, ur zikinak ibaiari kalterik egiten ez bazion, fabrikari ere ez zion inolaz ere kalterik egingo; beraz, izutzeko batere arrazoirik ez zegoen, Urumeara arazi gabe botatako urak atzera ere barne-zirkuituan erabiltzeak ez baitzuen gaitzik eragingo. Bi enpresatatik igaro ziren aurrez ekologistak, bizikleta gainean, eta haien isurbideak zakuz itxi, urik ez pasatzeko.

1984/06/13. Osoko bilkuran hartutako erabakien berri Gobernu Zibilari eman ordez Nafarroako Gobernuari emango ziola esan zuen Lekunberriko Kontzejuak.[151]

1984/08/11. Gipuzkoan poliziaren entzunaldi telefonikoak zenbateraino igo ziren ikusita, **haiek instalatzeari utz ziezaiotela eskatu zien CCOO-k Telefónica enpresako langile eta teknikariei**.[152]

1985. **Eragozpen fiskalari** buruzko lehenbiziko esku-orria banatu zuten.[153]

151 "Euskadi 1984", *Egin* egunkariaren urtekaria, 122. or.

152 *Ibidem*, 150. or.

153 José Antonio Pérez: *Manual práctico para la desobediencia civil*, Pamiela, Lizarra, 1994, 90. or.

1985/02/16. Iberduero itxi zuten. Urte hartako inauterietan, Energia Nuklearraren aurkako Komiteko kideek Donostiako Hernani kaleko Iberdueroren bulegoak “itxi” zituzten. Hara inguratu zen jendeak arretaz eta ezin sinetsirik bezala begiratzen zien **bulegoetako sarrera adreiluz eta zementuz itsutu** zuten ekintzaileei. Fatxadan, komite-kideek pankarta bat jarri zuten: “Iberduero lapurra”. Ekintza haren berri ematen zuen kartel bat ere bazuten: “lapurrak eta gangsterrak izateagatik itxitako lokala”. Tarifen gorakadaren aurkako protestaldia izan zen hura.

1985/02/16. **Kontrol batek erradioaktibitatea neurtu zuen, alkohol-maila neurtu ordez**. Iruñeko inauterietan, energia nuklearraren aurkako ekintzaileek “**kontrol atomiko**” bat jarri zuten Gaztelu Plazan. Herritarrei adierazi zitzaienez, pilotu estatubatuar bati bonba nuklear bat erori omen zitzaion Bardeetan, eta haizeak era arriskutsuan omen zekarren euri erradio-aktiboa Nafarroako hiriburura. Hura kontrolatzea zen, beraz, ekintzaileen helburua, eta halaxe zuritu zuten beren ekintza. Hamar urte geroago, 1995eko urtarrilaren 21ean, MAIA taldeko kideek Baionako errepidea moztu zuten, antzeko simulakro bat egin eta **kontrol militar** bat jartzeko.

1985eko martxoa. **Tituluak**. Energia nuklearrik gabeko guneak ezagutzera emateko beste modalitate bat. Norberaren etxebizitza, ataria, lantokia, jolaslekua, taberna, edo dena delakoa energia nuklearrik gabeko gunea zela adierazteko kanpaina izan zen hura.

1985/04/13. Belgikar bakezaleek Florenneseko gune militarrean **sartzea lortu zuten, eta han askari galanta presatu**. Izan ere, martxoaren amaieran NATOren lehenbiziko euromisilak jarri zituzten esparru hartan.

1985eko apirila. **Eragozpen fiskalaren aldeko lehenbiziko kanpaina** Nafarroan, KEM-MOC taldeak eta loturarik gabeko beste hainbat lagunek osatzen zuten Eragozpen Fiskalaren Aldeko Komisioak sustaturik. Bere urteroko aurrekontuetan estatuak ezarritako **gastu militarren portzentua ez ordaintzera** deitu zituzten Nafarroako herritarrak. Ekintza horrixe heldu zioten bigarren urtez, 1986ko apirilean, eta beste hainbat taldek parte hartu zuten: NATOren aurkako Mugidak, Komite Internazionalistak, Iruñeko Talde Antimilitaristak eta Bakearen eta Desarmearen aldeko Taldeak, besteak beste.[154]

1985eko maiatza. **AEBko presidente Ronald Reagan Espainiako estatura etortzearen aurkako hainbat ekintza** egin zituzten: udal-akordioak, ekintza irudimentsu eta bateratuak, mozorroak, gosaltzeko txokolatea eta

154 “Nafarroan zehar”, *Egin* egunkaria, 1986ko apirilaren 27, 21. or.

**esnegain-*bonbak***, “pistoladun gangsterraren aurkako festak”, geldialdiak irakaskuntzan, eta abar.

1985/05/04. “**Welcome Mr. Donald”.** Iruñeko hainbat taldek “Donald” Reagan presidentea hartu zuten. Presidentearen baloi aerostatikoa San Jorge hiribidera iritsi zelarik, “harrera-komite bat zain zegoen, eta agintariak ere hantxe ziren, bai eta *egur* ugari ere”. Horren ostean, hiriko “sarraila” eman zioten “Donald” presidenteari, eta gero, hainbat hitzaldi ere egin zituzten; aurreraxeago, berriz, *jumelage* halako bat (senidetze bat, alegia) egin zuten mozorroek eta Ku Klux Klaneko kideek, bai eta musika-ekitaldiak ere, *made in America* gisakoak, West Pointeko musika-bandaren eskutik. AEBko presidentea paliopean eraman zuten, Opuseko astapito nagusiak lagundirik; albo batean, berriz, “alkatutsa”, militar bat, torero bat, hainbat moja eta errekete bat. Den-denak abiatu ziren ibilguan barrena, harik eta gaztetxetzat nahi zuten lokal batera iritsi eta hura okupatu zuten arte, bene-benetan okupatu ere.

1985/05/05. **Lehorreratzea Kontxan**. 300en bat “marine” Aquariumetik hondartzara abiatu ziren txalupa eta ontzietan: uniformea behar bezala jantzirik, txiklea mastekatuz eta era guztietako tresnak soinean zeramatzatelarik, hainbat suziri eta kohete bota zituzten, eta txaranga bat ere bazeramaten alboan. Behin hondartzara iritsi zirenean, han zain zeuzkaten hainbat taldek hondarra nahiz ura bota zieten inbaditzaileei, eta borroka gogor askoa piztu bi aldeen artean; azkenean, hala ere, inbaditzaileak izan ziren nagusi. Orduantxe hasi zen segizioa: Reagan denen buruan, kapotik gabeko *dos cavallos* batean, inguruan hainbat bizkartzain zituela; atzetik, berriz, jarraika, Askatasunaren Estatua, zangaluzeak, paperezko dragoi bat eta asto bat, gerraren, errepresioaren eta Erdialdeko Amerikan muturra sartzearen aurka oihu eginez. Euri zaparrada ikaragarria ari zuen botatzen, baina, nolanahi ere, 3.000 lagunek manifestazio ikusgarria egin zuten Gobernu Militarraren pareraino. Han, poliziak gogor egin zien eraso manifestariei. Esan gabe doa, noski, bertako profesionalek irabazi zutela borroka hura.

1985/05/15. **Denak eragozle**. Kontzientzia-eragozpenaren aldeko nazioarteko egun huraxe aukeratu zuten, gobernu zibiletara eragozpen erabatekoaren aldeko ahalik eta gutun gehienak igortzeko.

1985/05/30. **Futbol partida osoko bilkuran**. Urteak ziren Hondarribiko Amute auzorako kirol-gune bat eskatzen ari zirela. 1980an hasi ziren eskariak. 1984an onartu zuten obrari ekiteko aurrekontua, baina urtebeteren buruan ezertxo ere egin ez zutela ikusirik, Auzo Elkarteak mozio bat aurkeztu zion udalbatzari, ostera ere eskatuz hura lehenbailehen egin zezatela. Amak, aitak eta seme-alabak, den-denak joan ziren osoko bilkura hartara; iskanbila aparta,

alajaina! Ikusirik alkateak beste egun baterako utzi zuela mozioari buruzko eztabaida, **gaztetxoenek futbol partida bat antolatu zuten udal-aretoan bertan**. Alkateak bilkura eten eta hara bertaratuek uhuka erantzun zioten.

1985/07/10. Frantziako zerbitzu sekretuek **Rainbow Warrior** ontziaren kroskopean jarritako itsaspeko bi lehergailuk **Greenpeaceren ontzia hondoratu zuten**, Zeelanda Berriko Aucklandeko itsas portuan. Mururoako atoloian, **Hego Pazifikoan, Frantziako estatua egiten ari zen proba nuklearren aurkako kanpaina** gogorrenean zegoela, itsasontzi ekologista portura hurbildu zen, han petrolioz hornitzeko. Erasoaren ondorioz, ontzia hondoratu eta barruan zegoen **Fernando Pereira** argazkilari ekologista portugaldarra hil egin zen. Kasu hark itzeleko zalaparta sortu zuen, geroago jakin ahal izan baitzen haren atzean Frantziako gobernua eta zerbitzu sekretuak zeudela; Dominique Prieur eta Alain Mafart agenteak Zeelanda Berrian bertan atxilotu zituzten. Ez, ordea, hirugarren bat. 1995ean, proba nuklearren programari utziko ziola adierazi zuen Frantziak; urtebete geroago, berriz, Nazio Batuek Proba Nuklearren Erabateko Debekuaren Tratatua sinatu zuten.

1985/07/28. Desarme Nuklearraren aldeko Kanpainaren barruan, Londresen iparraldetik ehun kilometrora dagoen Molesworthteko **gune militar angloamerikarrean sartzea lortu zuten**. 35 bakezale atxilotu zituzten. Bost hilabeteren buruan (1985eko abenduaren 28an), Londresen ekialdeko gune militar bateko hornidura-fabrika batean **hainbat zulo egitea lortu zuten** ehunka lagunek; inguruak zaintzen zebiltzan zazpi ekintzaile atxilotu zituzten. Desarme Nuklearraren aldeko Kanpaina bultzatzeko Mugimendu Kristauak (Christian-CND) egin zuen deialdi hura.

1985/08/02. **Pikotxez eta mailutzarrez baliaturik, Bilboko San Inazio auzoko hogeita hamarren bat auzo-lagunek** inguruetan zegoen **Dibisio Urdinari eskainitako monumentua eraitsi zuten**. Auzo-ekintza bukatzear zegoela, Polizia Nazionala iritsi eta pertsona bat atxilotu zuten, "birrintzetresnak zeuzkan pertsona" bera zela leporatuta. Komisariara eraman zutelarik, hura aske utzi bitarterainoko elkarretaratzea egin zuten hainbat herritarrek.

1985/08/03. **"Barraskilo Operazioa"**. Halaxe deitu zioten Seaskak egindako ekimen bati: abuztu bete-betean, trafikoa oztopatu zuten behe abiaduran zihoazen hainbat autok, Baiona eta Donibane Lohitzune lotzen zituen errepidean, lehenengo, eta Donibane eta Hendaia lotzen zituen errepidean, gero. Turista sufrituak saiatu ziren, saiatu, ekintza haren arrazoiak ulertzen, Seaskak propio banatu zituen esku-orrietan zioena irakurriz. Jendarme mordo bat bertaratu eta protestaldiarekin akabatu zuten, autoei behartuz lasterrago joan zitezen, bai eta semaforoen argi gorria nahiz stopak pasa zitzaten ere.

Seaskak denbora luzea zeraman eskatzen euskarazko irakaskuntza legezta zezatela.

1985/09/21. **Bidoi arriskutsua Kontxan**. Londresen Zabor Erradioaktiboei buruzko IX. Biltzarra egin zuten egun berean, erradioaktibitate-zeinua ageri zuen bidoi bat agertu zen Donostiako Kontxako badiaren uretan. Sekulako zalaparta sortu zen, eta hainbat "bainularik" agudo baino agudoago deitu zieten Babes Zibilari, poliziari nahiz osasun-zerbitzuei. Azkenean, udaltzainek hondartzatik kanporatu zituzten bainulariak; bitartean, berriz, hainbat teknikarik bidoia ongi bermatu eta Onkologikotik propio eramandako tresna batez baliaturik haren erradioaktibitate maila neurtu zuten. Zalaparta, ordea, guztiz funsgabea izan zen, eta hala, hondartza bere hartara itzuli zen, ostera ere. Izan ere, energia nuklearraren aurkako hainbat ekintzailek bota zuten bidoia uretara txalupa batetik. Energia Nuklearraren aurkako Komiteek nahiz Ekologistek zabaldutako ohar batek argi azaldu zuen ekintza haren nondik norakoa: "Gaur gezurra izan arren, bihar egia izan liteke". Egun batzuk lehenago jakin ahal izan zenez, hainbat bidoi arriskutsu galdu ziren garai hartako zenbait uholdetan.

1985/10/05. Iruñeko Auzo Elkarteak deituta, **udal-zergak ez ordaintzeko eskatu zitzaien herritarrei**, haiek zer-nolako gorakada izan zuten ikusita. "Egin dezakegu, eta egingo dugu. Hasteko, ordainketa helbideratuta baldin baduzu, alda itzazu datuak lehenbailehen. Oso baita erraza aurrezki kutxara edo bankura joan eta agintzea ordainketak ez ditzatela egin. Hori horrela egiteko eskubidea duzu, eta ezin dizute trabarik jarri; dena dela, egizu hori guztia ahal bezain agudo, erreziboak iristear daude-eta". Gauza bera egin zuten, halaber, Alde Zaharrean, Griserasen eta Lourdes Tuterakoa auzoan. Iruñean nahiz Barañainen, burrundara-aldiak eta isilaldiak egin zituzten 1985eko abenduan: "injustiziari desobedientzia zibilaren bidez erantzun behar zaio".

1985/10/27. Dozenaka lagunek trafikoa moztu zuten Donostiako Larratxo auzoan, kirola egiteko guneak eskatzeko. Trafikoa etenda, **futbol partida bat jokatu zuten kalearen erdi-erdian**.

1985/10/12. **Gobernu Militarraren fatxadari txiza egin zioten**. 50 eragozle Donostiako Gobernu Militarrera joan eta haren fatxadari txiza egin zioten, kontzientzia-eragozleen nahiz lagun espetxeratuen egoera larria salatzeko.

1985/11/09. **Moda-erakusketa eta "bizkarreko militarra"** Iruñeko kaleetan: "Datorren udaberrirako NATO jantzi-bilduma". Liburu baten aurkezpena ere egin zuten: *Zazpi arrazoi zazpi, NATOn egoteko* izeneko liburuarena, alegia. Bufoiak, artistak eta titiriteroak nahasirik zeu-

den Ziripot txarangarekin eta Minnesotatik iritsi zen zazpigarren zalduntzako musika-bandarekin. Hantxe ziren, orobat, elkarrekin konpontxo eginda, Armada Galezina, Errazdun Bengaliarrak, Mahai-berontziduneko Zaldunak, Vatikanoko Guardiaren Aingeru-legioa, Intenden(t)CIA eta Bizirik Ateratakoen Batailoia (garezur bat). Inork esan ez bazuen ere, ekintza haien guztien atzean NATOren aurkako Taldea zegoen.

1985/11/10. Armadaren unitateek **martxa militarra** egin zuten Donostian. Soinu militarren hotsean, hainbat taldek elkarrekin desfilatu zuten; tartean ziren, besteak beste, honako hauek: Garbitzaile Matxinoen Batailoia, Iruñean ere desfilatu zuten Mahai-berontziduneko Zaldunak eta Errazdun Bengaliarrak, Mariaren Infanteria, eta Polisario Komandoa. Martxaren berri eman zuen zuzen-zuzenean “Sarraskia 16” esan zioten irratiak, eta publizitatea ere eman zuten, tarteka. Desfilea Donostiako Bulebarrera iritsi zelarik, zain zeuzkaten han Filipo González eta *Donald* Reagan presidenteak, nork bere emaztea alboan zuela; bitartean, berriz, Aita Santuak hamar aginduen berri ona zabaldu zien hara bertaratutakoei. Desfile burrunbatsu haren buruan, pankarta bat jarri zuten, eta han idatzirik honako mezu hau: “OTAN ez, irten eta kitto. Asamblea anti-OTAN”. Gobernu Militarreraino joateko asmoa zuten arren, polizia andana batek galarazi egin zien hara hurbiltzea. Eta hori, jakina, ez da txantxetan hartu beharreko kontua. Poliziarekin nola edo hala negoziatzen zuten bitartean, tropek hainbat konsigna oihuztatu zituzten; hala, adibidez: “Desegin zaitezte, edo eraso egingo dizuegu” eta “Soldadutza kaka bat da”. Une horretan, irrati libre bateko bi erreportari ausartek –uniformeak soinean, eta pixontziak buruan zeramatzatela– poliziako teniente arduraduna elkarrizketatzea lortu zuten. Hortxe amaitu zen dena.

1985/11/22. **Kexakizun-orriak A-8 autobidean**. EHEko kideek A-8 autobideko ordain-erreziboa euskaraz eman ziezaietela eskatu zuten. Kexakizun-orrietan beren protesta idazten utzi ez zieten arte, sekulako kotxe-ilara sortu zen Zarauzko ordainlekuan. Ordaintzeke pasatzen utzi behar izan zieten EHEko kideei.

1985/12/29. **Lur-ematea eta eskela**. Segizio batek hilkutxa bat eraman zuen Bilbon, Kontzientzia Eragozpenari buruzko Legea sinbolikoki adierazteko. Hala, bada, lege horren lehenbiziko urteurrena ospatzeko, hilkutxa hura itsasadarrera bota zuten. Ibilbidean honako eskela hau banatu zuten: “Eragozpenari buruzko Lege gaixoa bete baino lehen hil da. Hari lur ematea baizik ez zaigu geratzen. Gerra Ministerioak jaso beza bere museoan”.

1986/01/18. Hainbat lagunek Nafarroako Jauregiaren eraikina setiatu zuten. Nafarroako gobernu nahiz parlamentuaren egoitza da hura. Udal-

zergen gorakadaren aurka protestatzeko egin zuten ekintza hura, bai eta bi erakunde nafarrek 1986an gorakada hari eutsiko ziotela erabaki izanaren aurka protestatzeko ere. Fatxadan bi pankarta jarri zituzten: “Basta de subidas. **Ez dugu ordainduko**. Diputación, Ayuntamiento, nido de ladrones” eta “Contra la subida de la contribución. **No vamos a pagar**”. Danbor- eta pandero-hotsek alaitu zuten egun hura. Etxe-sail osoa setiatu zuten herritarrek. Bi kohetek amaitutzat eman zuten setioa, eta gero, ehunka pegatina eta kartel jarri zituzten inguruko fatxadetan.

1986/01/26. **“Bardeen Eguna”** Tuteran. NATOren aurkako eta Euskadiren subiranotasun nazionalaren aldeko Manifestua taldeko kideek antolatu zuten ospakizun hura. Tiro-gunea eraistea eskatu zuten.

1986/02/02. Eibarko Star arma-fabrikaren aurrean, hainbat feministak **harizko armiarma-sarea egin** zuten.

1986/02/05. Britainia Handiak eta Alemaniak Bilbon dituzten **kontsulatuak egurrez itxi zituzten**. NATOren aurkako Mugida elkarteko kideek hainbat egur-zati josi zizkieten kontsulatuetako ateei. Salaketa nabarmen askoa egitea zuten helburu: “Itun Atlantiko inperialistan parte hartzen duzuelarik, Euskal Herriaren eta munduko beste herri batzuen etsaiak zarete”. Gauza bera egin zuten PSOEren egoitzan, eta atean hau zioen kartela itsatsi zuten: “OTAN ez, PSOE chaqueteros”.

1986/02/07. **Ez da umorerik galdu behar, ezta NATOren ondorioz ere**. Inauteriak aprobetxatuz, subiranotasun nazionalaren aldeko eta NATOren aurkako Manifestua prentsa-aurrekoan aurkeztu zuten Donostian. Adierazpen hartan parte hartu zuten pertsonek konfetiz, serpentinaz eta kartelez apaindu zituzten aretoko hormak. Bozemailea pailazoz mozorrotuta agertu zen, sudurgorri eta buru-soil eta guzti: “Emanaldi hauek izango dituzue ikusgai...”.

1986/03/06. **Filipo Mazedonia Gonsales eta Romualdo Kartoi-aurpegi Riganen arteko ezkontzarako menua atondu zuten**. NATOren aurkako Mugidak parodia egin zuen hainbat herritan. Hara zer menu prestatu zuten: “Antzara-zopa, tortura espainola, errusiar xerrak, Presidente txerri-muturrak, marrubizko postrea Natorekin, Ardozeko torrijoiak Bardeetako anis erara eta hainbat kaka-pastela. Edateko, Trikorniu xanpaina, fatxarana eta zurrabaskotea”.

1986/03/10. **Itzalaldi burrunbatsua NATOren aurka**. Hilaren 10ean egin zuten hamar minutuko argi-itzalaldia, gaueko hamarretatik hamarrak eta hamarrera arte. Itzalaldiarekin batera, ordea, itzeleko burrunba: koheteak, suziriak, kanpai-hotsak, kalejirak, taldekako kazolakadak balkoietan...

Hainbat herritan kaleko argiak itzali zituzten. Santiagomendin, baserritarrak tiroka ibili ziren beren ehizako eskopetekin; Irrintzi irratiak Errenteriako kaleetatik egin zituen irratsaioak. Ez zen, oro har, inolako arazorik izan; dena den, Oñatiko udal-argiteriaren itzalaldiak Guardia Zibilaren kuartelari eragin zion, eta horrek arazo larria sortu zuen. Hala, bada, guardiak kaleetara irten ziren, haserre, eta pertsona bat atxilotu zuten. NATOn sartu bai ala ez erabakitzeko egin behar zen erreferendum-egunaren bezperan burutu ziren ekimen haiek guztiak; hainbat taldek parte hartu zuten ekintzetan: Subiranotasun Nazionalaren aldeko eta NATOren aurkako Manifestuak, NATOren aurkako Mugidak eta Bakearen eta Desarmearen aldeko Taldeak.

1986/03/12. **Botoak oraingoan**. Nahiz eta lehendakariak, Nafarroako presidenteak eta gehiengoa zuten alderdi politikoek NATOn sartzearen alde iritzia emana zuten, Hego Euskal Herriko erreferendumean parte hartu zuten hautesleen %60tik gehienek ezetz esan zioten Espainiako estatuak NATOn jarraitzeari. Emaitzak aski garbiak izan ziren: Ezetz, %40,9; baietz, %21,5; abstentzioa, %34,9. Bototan, berriz, honela geratu ziren emaitzak: Ezetz, 828.721 boto; baietz, 434.553 boto; abstentzioa, 706.311 herritar; zuri, 43.450 boto; baliogabe, 12.382 boto. Katalunian nahiz Kanarietan ere Ezetzak irabazi zuen. Estatuko beste erkidegoetan, ordea, Baietzak irabazi zuen.

1986/04/08. **Greenpeace**ko kideak **Nevadako desertuko** tiro-gune batean sartu eta **proba nuklearrak** bertan behera uztera behartu zuten AEBko gobernua.

1986ko maiatza. **Keinu bat**. Elkarretaratze isilak egiten hasiak zeuden sei taldek **Euskal Herriko Gesto por la Paz taldea** sortu zuten. Barruan bakearen usoa daraman Euskal Herriaren mapa batez baliatu ziren anagrama egiteko. Edozein pertsona, edonola, edonon eta berdin da zer-nolako motibazio politikoren ondorioz hiltzen zutenean, talde sortu berriak “keinu” isil halako bat egitera deitzen zituen herritarrak. Keinu horiek 15 minutu irauten zuten. Izan ere, Gestokoentzat isiltasunak bazuen indar bat, aski berezia: “Isiltasuna dugu adierazpenik baketsuena; gure taldea ere halakoxea da. Dena den, gure isiltasuna ez da inondik ere etorkor edo pasiboa indarkeriarekin, ez eta zalantzati edo ikaratia ere balio demokratikoei dagokienez; gure isiltasunak irmotasun etikoz betetzen ditu gure kaleak”.

1986/07/05. **Manifestazioa ardiekin** Iruñean, Erreniega mendizerran altxa nahi zituzten instalazio militarren aurka protestatzeko.

1986/11/16. **Kartutxadak**. Mendi Garbiak Talde Ekologistak Etxalarko ehizako postuetan jasotako 360 kilo kartutxo eta zabor bota zituzten

Nafarroako Diputazioaren, Ehiztarien Elkartearen eta Euskal Piel dendaren atari aurrera.

1987/02/11. **Esne-ekoizpenari buruzko adierazpena boikotatzeko** deia egin zuen EHNEk.

1987/03/22. **Rotako itsas gune militarrerako sarbideak itxi zituzten** hainbat

1987/04/10. **Itxialdia eta kateatzea** Madrilen, “Guernica Gernikara” ekar zezatela eskatzeko.

1987/04/11. Bi lagunek uko egin zioten Lekeitioko **ertzainekin gaztelaniaz hitz egiteari**; hargatik, bi-biak atxilotu zituzten. Haietako bat bigarren aldiz ere atxilotu zuten geroago. Bi egun eman zituzten kuartelean.

1987/04/26. Durango, Galdakao eta Gernikako bonbardaketen berrogeita hamargarren urteurrena bete zela-eta, Gernikako **Comisión Gernika 37-87** plataformak hainbat ekimen antolatu zituen hilaren 16an hasita; besteak beste, **bakearen eta desarmearen aldeko nazioarteko kongresu bat** egin zuten. Era berean, udalak politika eta kultura munduko zenbait pertsona ekarri zituen munduko hiri zigortuenetatik. Hilaren 18an, Alemaniako **Petra Kelly** diputatu berdeak lore-sorta bat ipini zuen Gernikako Arbolaren altzoan, adiskidetasun-zeinu gisa. Hilaren 10ean, Gernikako Bakearen Aldeko Aztertegia eratzea adostu zuen Eusko Legebiltzarrak. 1987ko azaroaren 6an eratu zen ofizialki **Gernika Gogoratuz** elkartea.

1987ko maiatzaren 10, 11 eta 13. **Emakumeek hartu zuten iniziatiba**. Kadizko Chiclana herrian zenbait talde feminista eta bakezaletako emakumeek **manifestazio bat egin zuten biluzik**, eskandalu publikoa sortzea leporatu zitzaien bi gazteren atxiloketak salatzeko. Beste hainbat ekintza ere egin zituzten: hilaren 9an, adibidez, **Guardia Zibilaren kuartelaren aurrean eserialdi bat egin zuten** hainbat emakumek, eta egun berean **udaletxean itxi ziren**, deuseztatu nahi zituzten lan-postuen alde agertzeko eta poliziaren jazarpena salatzeko; Kadizko Puerto Real herrian ere egin zen protesta: 200 emakume **beltzez jantzita manifestatu ziren**, poliziak beste langile bat hil izana arbuiatzeko.

1987ko 18tik 21era. **Kanpaldia** Jaizkibelen: “*Militarrak kanpora. Jaizkibel herriarentzat*”.

1987/06/18. Donostian, **Iberdueroren bulegoak urez estali zituzten sinbolikoki**, Riañoko herritarrei elkartasuna adierazteko. Izan ere, herri hura desagerrarazi nahian zebiltzan, urtegi baten proiektua aurrera ateratzeko.

Eguzki taldeko hainbat kidek urez betetako ontzi bat bota zuten zorura; leuntasunez, betiere, ez zipriztintzeko...

1987/07/15. Pasaiako portuan, **itsasontzi bat okupatu zuten**, lanetik bota izana salatzeko. Poliziak ekintza hartan parte hartu zuten kontratupeko bederatzi langileak atxilotu zituen.

1987/07/29. **Hainbat tren okupatu zituzten**, doako garraiobideak eskatzeko. Bizkaiko Langabetuen Elkarteko kideek burutu zuten ekintza hura; gauza berari ekin zioten abuztuaren 4an, Bilboko Ezker Ibarrean, eta abuztuaren 5ean, Deustutik Santurtzira zihoazen trenetan.

1987/09/10. Greenpeaceko lau kide atxilotu zituzten Mallorkan, **AEBko barku militar bati amarratzen ez uzteagatik**.

1987/09/28. Seaskak **eskolak eman zituen Baionako plazan**, bitarteko gehiago eman ziezazkietela eskatzeko.

1987/11/08. Gipuzkoako Ernio mendian **horiz margotu zituzten ehizako postuak**, hegaztiek hura ikusteko moduan. Ehizaren aurkako ekintza ekologista izan zen hura.

1988. Hogeita hamar urte luzez AEBko UFW sindikatuko buruzagi izan zen **Dolores Huertak** (sindikatu horri buruz, ikus César Chávezi buruzko aipamena 1965. urteari dagokion ataltxoan) berdintasunaren aldeko lan eskerga egin zuen 80 eta 90eko hamarkadetan. Hizlari aparta eta antolatzaile bikaina zelarik, langile etorkinen iritzi ona irabazi zuen, eta emakumeak neurri egokian balioets zitzatela lortzeko borrokan ere nabarmendu zen. **Seattleko Indarkeria-ezazko protestaldi batean polizia batek basatiki jo** eta ospitalera eraman behar izan zuten. Larrialdietako gelan egin zioten diagnostikoa: hainbat hezur eta saihets hautsirik. Protestaldi hura jasotzen duen bideoan argi ikus zitekeenez, polizia batek gupidagabe jipoitu zuen emakumea, nahiz eta berak agentearen esanei amore eman eta atzeratuta egon ordurako. Chávez eta Luther King bezala, gizaki guztien eskubide zibilen aldeko erreferentzia ezin ukatuzkoa da Huerta bera ere.[155]

1988. Ezkerreko zortzi feminista mendebaleko Jerusalemgo kaleetara atera ziren, **beltzez jantzita eta isil-isilik**, palestinar lurraldeen okupazioa gogor salatzeko. Era horretara sortu zen **Beltzez jantzitako Emakumeak** izeneko taldea. Haien asmoa zen emakume palestinar zein israeldarren arteko zubi-lana egitea; hala, 1994. Urtean *Jerusalem Link* izeneko zentroa abiarazi zuten israeldar emakumeen *Bat Salon* elkarteak eta emakume palestinarren *Jerusalem center for woman* elkarteak. 1989. urtearen amaie-

155 http://www.doloreshuerta.org/

ran, berriz, 6.000 emakumek manifestazio bat egin zuten, “Ibilian doazen emakumeak” esaten zuen goiburuarekin. 1991. urtean, **Belgradeko Beltzez jantzitako Emakumeak** taldea sortu zuten. Indarkeriarik gabeko protestaldiak egiteaz arduratzen ziren emakume feministek eratu zuten talde hura, gerra, agintari serbiarren gogorkeria, garbiketa etnikoa eta ezein diskriminazio-egoera salatzeko betiere. Balkanetan zubi-lana eta demokrazia sustatu nahi zituzten:

> “10 urte gerra-egoeran eman ostean, beharrezkoa da geure buruak desarma ditzagun/ Bake armatua ez da egiazko bakea/ Bakea ez da gerrarik eza/ Indarkeria-eza giza eskubide bat da/ Gure izenean baino ez dugu hitz egiten/ Ez gaitu inork ordezkatzen, ez gobernu batek ez nazio batek/ Geure buruaren ordezkari gara/ Gerra oro krimena da/ Gerra oro da bidegabe eta ezin zurituzkoa/ Kanpora gerra historiatik eta gure bizitzatik/ norbera hiltzearen eta besteren bat akabatzearen artean bada hirugarren bide bat: bizitzea, alegia”.

Beste zenbait elkarterekin batera, Beltzez jantzitako Emakumeak taldeak **Gerraren aurkako emakumeen nazioarteko solidaritate sarea** eratu zuten. Bilboko emakume-talde batek ere parte hartu zuen sare hartan.[156]

1988/01/19. Bardeetako tiro-gunearen aurkako Biltzarra eratu zuten.

1988/11/11. Soldadutzarako zozketen aurkako borroka-eguna.

1989/02/08. Eragozle iheslariek **soldadutzara joateko beren txartelak itzuli zituzten**.

1989/02/20. Nahitaezko soldadutza nahiz Ordezko Gizarte Zerbitzua (PSS) egiteari uko egin zieten **intsumisoen lehenbiziko aurkezpen kolektiboa** Espainiako estatuan; guztira, 57 gazte bildu ziren han. Beren burua erruduntzat hartu zituzten lehen aldiz; intsumiso bakoitzeko, lau erakundek edo pertsonak erruduntzat jo zuten beren burua, haiek delitua egitera bultzatzeagatik. Lehenbiziko atxiloketak. Lehenbiziko epaiketak. Nahitaezko soldadutza kentzearen aldeko manifestua. Urte hura amaitzerako, 190 intsumiso zeuden Euskal Herrian. Espainiako Justizia ministroak, Enrique Múgica Herzogek, argi eta garbi esan zien “legearen pisua eroriko zitzaiela”.

156 Emakume haiek feministak, bakezaleak eta antimilitaristak ziren. **Beltzez jantzita**, dolua adierazi nahi zuten, hala nabarmenago ikusiko zituztelakoan. Zernahi indarkeria nozitzen ari ziren emakumeen dolua bere egin zuten. **Isilik**, “gerra, terrorismo eta indarkeria egoera orok sortzen duen izua hitzez adierazi ezin delako. Isiltasunak jendearen arreta pizten du, nonahi; era berean, historian zehar horrenbeste emakumeren ahotsa ito izana salatzeko bitarteko baliotsua ere bada”. Emakumeak, “logika patriarkalaren oso bestelako logika bat adierazten dugulako; gure logikaren oinarrian anaitasuna, solidaritatea, babesa, samurtasuna eta elkarrekiko errespetua daude.” Hala, bada, bakea eta indarkeria-eza hautabide izan dezakeen politikatzat har daitezke emakumeen arteko elkartasun-ekintza horiek (www.mujeresdenegro.org/quienes.asp)

1989/03/26. **Zintzilik**. Irurtzungo *Bi Ahizpak* hormatik zintzilika jarri zuten plataforma igo zuten txandaka hainbat eskalatzailek, Leitzarango autobidearen proiektua salatzeko. 15 egunez iraun zuten zintzilik. 1990ean horma esanguratsu hura eskalatu zuten, ostera ere.

1989/04/18. Gasteizko erdiguneko kale batean, hainbat eragozle **kateatu ziren, handik konboi militar bat pasatzen ari zela aprobetxatuz**. Lau eragozle **tanke batera igo ziren**, baina berehala bota zituzten handik, tiraka eta bultzaka; gainerako guztiak, aldiz, gogor kolpekatu zituzten.

1989/06/05. Pekingo Betiereko Bakearen Hiribide Nagusi edo *Cháng An Dà Jie* izenekoan, Tiananmen plazatik gertu, pertsona bat **tanke mordoxka baten erdian paratu zen**, aurreko egunean horrenbeste hildako eta zauritu eragin zituen jazarpena salatzeko. Aurre-aurrean zihoan tankea gizon hura ezker-eskuin saihesten saiatu zen; baina bi poltsa baizik ez zeramatzan gizon adoretsu hura behin eta berriz tartekatu zitzaien militarrei, harik eta konboiak geratu beste erremediorik izan ez zuen arte. Orduan, tankera igo eta kontutxoren bat esan zien soldaduei.[157]

1989/06/18. **"Militarrak eta barkamena" gaitzat harturik, II. Marrazki Lehiaketa** egin zuten. Beriain eta inguruetako 130 neska-mutikok parte hartu zuten lehiaketan. **Erreniegako mendizerrako instalazio militarren aurkako IV. Festen** barruan ospatu zuten ekintza hura. Mila lagun inguru bildu ziren Erreniegako kanpalekuan. Nafarroako herritarren artean eztabaida sortzea zen antolatzaileen helburu nagusia: "Benetan nahi ote ditugu kuartel militarrak? Argi ikus dezatela jendeak paso egiten diela kuartelei eta halakoei; Nafarroa osoaren desmilitartzearen alde gaude, zeharo".[158] Erreniega babestutako leku izenda zezatela eskatu zuten.

1989/06/24. KEM-MOC eta Kakitzat taldeek antolaturiko martxan, **txartel militarrak erre zituzten** Aitzoaingo kuartelaren aurrean. Ekintza sinboliko horri eusten zaio oraindik ere, urtero egiten den martxan.

1989/07/02. Itoizko urtegia egitearen aurka zeuden hainbat manifestarik **Nafarroako Diputazioaren eraikina inguratu zuten, eta haren hormetan salaketa bat idatzi, klarionez**: foru-agintariek ez zituztela hartu, alegia. Martxoaren 4an, giza kate antimilitarista batek Iruñeko **kartzela inguratu zuen**, intsumisioaren alde eta intsumisoak atxilotzearen aurka arreta emateko.

157 Associated Press agentziako kide Jeff Winederrek egin zuen planeta osoak ikusgai izan zuen argazki ezagun hura. Beijing Hoteleko seigarren solairutik egin zuen argazkia, 400 mm.ko lente baten bidez, hiribidetik 800 metrora. Bideoa ikusteko, jo helbide honetara: http://video.google.es/videosearch?q=tiananmen&oe=utf-8&rls=org.mozilla:es-ES:official&client=firefox-a&um=1&ie=UTF-8&ei=Jm6QSZn2EtzFjAez0-SmCg&sa=X&oi=video_result_group&resnum=4&ct=title#

158 Pili Yoldi: 1989ko ekainaren 19ko *Egin* egunkarian.

1989/10/18. **Kanpaldi mugagabea** Uitziko gainean, Leitzarango autobidea eraikitzeko obrak hasiak zirela salatu eta hura atzera zezatela eskatzeko. Autobidearen Aurkako Koordinadorak egin zuen “protestaldi baketsu” hura. Kanpalekutik bertatik abiatuta, hainbat martxa egin zituzten (haietako batzuk gauez, ilargi betea lekuko zutelarik), eta beste hainbat ekintza ere sustatu zituzten: hitzaldiak, *Akanpada* izeneko argitalpena, landatze-lanak makinek suntsitutako lur-sailetan, eserialdi nahiz kartel-jartzeak, eta beste hainbat. Poliziak nahiz Guardia Zibilak indarkeriaz jokatu zuten, oso gogor. Zortzi hilabete iraun zuen kanpaldi hark.

### *90eko hamarkada*

1990. **Hautesle b(eh)erroldaren aldeko Plataforma** sortu zuten Iruñean. 1995eko azaroaren 30ean, Edurne Goñi plataforma-kidea epaitu zuten, maiatzaren 28ko hauteskundeetan **hauteskunde-mahai batean parte hartzeari uko egin ziola** leporatuta. Hilabetez atxilotu, eta 100.000 pezetako isuna ezarri zioten.

1990eko martxoa. **Lilatoia**. Emakume talde batek herri-lasterketa bat egin zuen lehenbiziko aldiz Donostian. Martxoaren 8aren aldeko Koordinadora Feministak antolatu zuen korrikaldia; geroago Lilaton Taldea esango ziotenak, alegia. Lehenbiziko urte hartan 125 emakumek parte hartu zuten; 20 urteren buruan, berriz, 2009ko martxoaren 8an, 1.300 emakume atera ziren lasterka.

1990/04/11. **Autobidearen aurkako Koordinadorako zazpi kidek gose-greba bati ekin** zioten Gorritin. Jan gabe 25 egun eman ostean, barauraldiari utzi zioten maiatzaren 6an, Lurraldea izeneko taldea ordurako “nahikoa sendotuta” zegoela iritzirik.[159] Astebete iraun zuen **beste gose-greba bat** ere egin zuten, Iruñean, 1991ko otsailean, autobidearen obrak hasiak zituztela salatzeko. 200 lagunek parte hartu zuten barauraldi hartan.

1990/06/11. KEM-MOC taldeko kideek **ONCE elkartearen kabina guztiak itxi zituzten** Bilbon. Ekintzaileek salatu zutenez, erakunde horrek laguntza paregabea eman omen zion gobernuari, Ordezko Gizarte Zerbitzua ezartzeko.

1990/09/31. Batetik, Irakek Kuwait inbaditu zuela salatzeko; bestetik, AEBen interbentzio militarra arbuiatzeko, **Pertsiar Golkora bake misioan zihoan belaontzia itsasoratu zuen Donostian KEM-MOC taldeak**.

159 “Ingurugiroa”; *Egin* egunkariaren ingurumen-gehigarria: *Cronología de un año*, II. eta III. or.

1990/10/26. **Zorutik ehun metrora, 60 eskalatzailek ekintza ikusgarria egin zuten**: Atxarteko meatzearen horman plataforma bat jarri eta haraxe igo ziren, 24 ordutik 24 ordura txandakatuz. Izan ere, “Labargorriko eskalada-horma historikoa” jaten ari omen zen meatze hura, eta ez omen zetorren bat Urkiolako parke naturalarekin. Plataformaren goialdean hamaka bat jarri zuten lehenbizi, eta han eserita eman zituzten 36 egun; gero, behera egin zuten, negoziatzen jarraitzeko. Baina 1991ko udazkenenean, ostera ere, plataformara igo ziren. Ertzaintzak birritan atxilotu zituen, hormara hurbiltzen saiatu orduko.

1990/11/09. **“Herri intsumisoa”**. Halakoxetzat jo zuen bere burua Lezok, osoko bilkuran hartutako erabaki baten ondorioz; alkateak eta hainbat zinegotzik erabaki hura hartu izana onartu, eta erruduntzat jo zuten beren burua.

1991. Euskal intsumiso baten aurkako lehenbiziko epaiketa militarra. Santa Cruz Tenerifekoan epaitu zuten Joseba Lazkano gaztea. Fiskalak bi urteko kartzela-zigorra eskatu zuen; gazteak, aldiz, **intsumisioarekin bat egin zezala eskatu zion Epaitegi Militarrari**. Intsumiso nahiz desertoreen gose-greba Alcaláko presondegi militarrean. Abenduaren 14an, lehenbiziko hiru intsumisoak eraman zituzten Baionako jendarmeriara.

1991/02/20. **Pertsiar Golkoko gerrara eramatekoak ziren erreklutek desertatu zuten**. 19 urteko Asier Sánchez santurtziar eragozlea eta Oscar Vicente bilbotarra atxilotu zituzten. Pertsiar Golkora abiatu baino lehentxeago *Asturias* fragata uzteagatik bilatzen zuten santurtziarra. Uztailaren 2an atxilotu zuten ostera ere; desertzioa leporatu zioten, **aske utzi zutelarik, bere postura itzuli ez zelako**. Nafarroan, Santi Quiroga izan zen lehenbiziko eragozle gaineratua (hau da: soldadutza egiten ari zela bere burua eragozletzat aitortu zuen); martxoaren 12an atxilotu zuten, eta 1992ko apirilaren 7an epaitu, desertore izatea leporatuta.

1991/05/22. **Bizkaiko Gobernu Zibilean behiak sartzen saiatu ziren**. EHNEko baserritarrek burutu zuten ekintza, Bilbon, esneagatik eta okelagatik ordaintzen zitzaizkien prezio irrigarriak salatzeko. Poliziak han sartzea galarazi zien, eta ukaldika erantzun, borraz.

1991/06/29. Hainbat guardia zibilek, zodiac ontzietan zihoazelarik, Greenpeaceren ontzi bat labanaz zulatu zuten. Aser enpresara eraman beharrekoak ziren **zabor toxikoak zeramatzan zamaontzi bat Santurtziko portuan sar zedin galarazi nahian ari ziren** kide ekologistak. 1992ko abuztuaren 21ean, Greenpeacek Borrell ministroari eskatu zion debeka zezala Aser enpresara eramatekoak ziren itsasontzi zaborduna Bilbon sartzea. Euskal Herriko 10 enpresa azter zitzatela ere eskatu zuten, eta orobat aurreratu zuten

indarkeria-ezazko hainbat ekintza burutuko zituztela Lass Sun ontziaren aurka. Gainerako talde ekologistek ere gauza berari ekin zioten. Dena den, kargaontzia gauez porturatu zen, eta zama Bilbon lurreratu, irailaren 4an.

1991/12/22. 59 kazetarik **beren burua erruduntzat jo** zuten, Ordezko Gizarte Zerbitzuen aurkako arbuioa sustatu zutela-eta.

1992. Gasteizkoak elkartea sortu zuten. Kolektibo antimilitarista sortu berriak aztergai zituen gastu militarra, armamentu-ekoizpena eta gizarte-kontrola. Horiei guztiei dagokienez, **txosten bat plazaratzen dute urtero**.[160]

1992/02/26. **Intsumisoen aurkako lehenbiziko epaiketa Euskal Herrian**. Iñaki Camachok eta Manuel Yerak Donostiako Auzitegi Probintzialean agertu behar izan zuten, Ordezko Gizarte Zerbitzua egiteari uko egin ziotela-eta.

1992ko martxoa. **17 urte pankarta baten atzean**. Hainbat irakasle bota zituzten EHUtik, administrazio-kontratupean irakasten jarraitzeari uko egin ziotelako. Unibertsitatea funtzionarioen kabi bihurtzearen aurka agertu baitziren hasieratik, kasuan kasuko lan-kontratuak eskatu zituzten, eta hasiera batean, 1990ean, onartu ere onartu zien hartarako eskubidea Bizkaiko Auzitegi Probintzialak; dena dela, aurrerago epaia ezeztatu zuen Euskal Autonomia Erkidegoko Justizia Auzitegi Gorenak. 1993ko azaroan hasita, irakasle-talde batek **protestaldi bati ekin zion; egunero ateratzen ziren Leioako campuseko sarrerara pankarta batekin**: "*Autonomiaren alde. Irakaslego propioa. Despidorik ez!*". Erresistentziazko diru-kutxa batek lagundu zien irauten. Kalera bota baino lehen, bi ikasturte jardun zuten irakasten, nahiz ordainik eta soldatarik ez zuten jasotzen.[161]

1992/03/10. Eragozleen eta Intsumisoen Familiartekoen Elkartea eratu zuten Nafarroan. Protestazko ekintza baketsuei ekitea erabaki zuten. Bizkaian ere antzeko elkartea sortu zuten ekainaren 16an.

1992ko apirila. **Adreiluz itxi zuten Hazparneko *Chambre d'Agriculture* zeritzonaren sarrera**. ELBk burutu zuen ekintza sinboliko hura; bitartean, berriz, 700 baserritar elkarretaratu ziren, haiek esneari ezarritako prezioari jaramonik egin ez zitzaiola salatzeko.[162]

1992ko apirila eta maiatza. Patxa kolektiboak deiturik, **martxa antimilitarista egin zuten Ipar Euskal Herrian**. Haren karietara, **Frantziako**

160 Gasteizkoak elkarteak liburu hau plazaratu zuen 2008an: "Mercaderes de la muerte made in Euskadi. La industria militar en Euskal Herria", Zapateneo, Gasteiz.

161 1999an liburu hau idatzi zuten: *Historia de una pancarta. La lucha por el profesorado propio en la UPV*.

162 Martine Sistiague: *ELB. Ipar Euskal Herriko laborarien oihartzuna*, Gatuzain, Baiona, 1999ko iraila, 198-200. or.

**poliziak lehenbiziko intsumisoa atxilotu zuen**: Patxa kolektiboko kide Eric Emile-Lexardoi, alegia. Martxak iraun zuen zazpi egunetan, beste bi intsumiso ere atxilotu zituzten: maiatzaren 4an, Jean François Lefort; eta handik lau egunera, Nikolas Padrones, Zuberoako Domitxinen. Baionan amaitu zen martxa, hilaren 8an. Emile-Lexardoiri eta Padronesi 10 hilabeteko kartzela-zigorra jarri zien Bordeleko Auzitegiak; Leforti, berriz, 13 hilabeteko zigorra jarri zioten, "obeditzeari uko egiteagatik", tribunalak ez baitzion "intsumisio" deliturik egotzi nahi izan. Hiru gazteek **22 eguneko gose-greba egin zuten, harik eta beste bost gaztek prentsa-aurreko batean beren burua intsumisotzat jo eta gose-greba bertan behera uzteko eskatu zieten arte**.

1992/08/19. Konpartsek hala erabakita, Bilboko Aste Nagusian egun bat eskaini zioten intsumisioari: "Intsumisioaren Eguna".

1992/09/13. Lurra Zain elkarteak **sinbolikoki okupatu zuen Arrangoitzeko golf-zelaia**, turismoari lotutako proiektu espekulatiboak salatzeko.

1992/10/09. **Burdinazko martxa**. Labe Garaietako ehunka lagunek 190 kilometroko martxari ekin zioten egun hartan; 18 egunez ibiltzea zen asmoa, Bilbon hasi eta Madrilen buka. Siderurgian egitekoak ziren birmoldatze erabatekoa salatzeko antolatu zuten protestaldi hura.

1992/12/09. **Intsumisioa gaitzat zuen komikia**. Gasteizko *Resiste* fantzineak komiki bat atera zuen; hogeita hamar marrazkilari eta umorista baino gehiago jardun zuten komiki hartan.

1992/12/14. 14/12/1992. Aranguren Haraneko herritar guztiek **beren burua erruduntzat agertu** zuten, makro-epaiketa batean epaitutako 22 herrikideri elkartasuna adierazteko. 1990ean, zabortegi baten aurkako herri-protestaldian istiluak eragitea leporatu zieten 22 herrikideei. Orduko hartan, Guardia Zibila gogor jazarri zitzaien protestaldian parte hartzen ari zirenei. 8 hilabeteko kartzela-zigorra jaso zuen José Antonio Villamayor alkateak; 7 hilabetekoa, Juan Manuel Sarasibar idazkariak; eta 6 hilabetekoa, gainerako akusatuek. Beste 11 lagun aske utzi zituzten, kargurik gabe. 1993ko urtarrilaren 15ean egindako beste epaiketa batean, **hainbat herritarrek beren burua erruduntzat jo zuten, ostera ere**.

1992/12/28. **Esadazu atzekoz aurrera, nik ulertzeko moduan**. Ehunen bat intsumiso eta antimilitarista Gasteizko Gobernu Militarrera hurbildu ziren, trajez eta gorbataz jantzita, eta babes osoa agertu zioten Armadari. Inuzenteen eguna izan, nonbait!

1993ko martxoa. **Berrehun abeltzain Angeluko Leclerc supermerkatuan sartu eta gazta bana eman zieten bezeroei, esku-orri batekin batera**.

Izan ere, Chaumesko esne-zentraleko ardi-esnearen prezioa itzelekoa zela ikusi zuten; haiek ordainetan jasotzen zutenaren aldean ikaragarri garesti, alegia.[163]

1993/04/23. **Alkate intsumiso baten aurkako lehenbiziko epaiketa**. Etxarri Aranazko alkate Manolo Campos epaitu zuten, soldadutzari zegokionez Espainiako Armadarekin ez kolaboratzera behartzen zuen udal-akordioa betetzeagatik. Bere karguan aritzea sei urtez debekatu zioten, eta 100.000 pezetako isuna ere ordaindu behar izan zuen. Bakaikuko alkate Francisco Javier Aiestaran Erdozia ere atxilotu zuten lehentxeago; hura, ordea, intsumiso izateagatik epaitu zuten.[164]

1993/05/15. Hogeita hamar gaztek sinbolikoki okupatu zuten **Armadaren gerra-ontzi bat**.

1993/06/23. Itoizko obretan erabili behar zituzten makinak herritik pasatzea debekatu zuen Longidako Udalak.

1993/07/10. **Herri-epaitegi** batek intsumiso bat absolbitu zuen Gasteizen. Parodia.

1993/12/12. **Desobedientzia hirugarren graduari**. Espetxe Erakundeek hirugarren gradua ematea erabaki zutelarik, euskal intsumisoek “planto” egitea erabaki zuten, neurri hura estrategia zatitzailea omen zelako eta auzi politikoaren gakoari jaramonik egiten ez ziolako: “Arazoa Armada bera da; hura konpontzeko bide bakarra, berriz, desobedientzia”. Justizia ministroak onartu behar izan zuenez, kontzientzia-eragozpena horrenbeste igo izanak arazo nabarmenak ekarri omen zizkion estatuari. Aurreko gauean kartzelara joateari uko egin zioten 34 intsumiso nafar Iruñeko San Cristobal Parrokian itxi ziren, baina berehala atxilotu zituzten. Hilaren 17an, Sarrikon itxialdia egiten ari ziren bizkaitar intsumisoak atxilotu zituzten. Hainbat eta hainbat protestaldi izan ziren tartean. Iruñeko kartzelan preso zeuden 46 intsumisoek gose-greba bati ekin zioten, eta ordainetan intsumiso haietako zortzi Espainiako espetxeetan barreiatu zituzten.

1994. Elkarrik sustaturiko “Euskal Herria. Akordioa 94” ekimenak **240.000 sinadura biltzea lortu zuen**, Euskal Herriko arazoa konpon zedila eta indarkeria bertan behera utz zezatela eskatzeko.

1994/03/08. **Epaiketetan ez agertzea erabaki zuten**. Imanol Dorronsoro intsumisoa ez zen aurkeztu Donostiako Auzitegian egitekoak ziren epaiketara, hura “fartsa” bat zela iritzirik. Patxi López euskal intsumisoak Madriletik

163 *Ibídem*, 210. eta 211. or.

164 Hautetsien aurkako beste epaiketa batzuen berri jakin nahi izanez gero, ikus 3. Eranskina.

gutun bat idatzi zion epaileari, eta bertan adierazi zergatik ez zen joan apirilaren 7an egin behar zuten epaiketara. Apirilaren 15ean, Ondarroako 5 intsumisok ere ez zioten men egin epailearen deiari, eta Bake Epaitegian itxi ziren, protestatzeko.

1994/06/04. Gipuzkoako zenbait intsumisok Donostiako Santa Klara **Uhartea hartu** eta gerrarik gabeko gune desmilitarizatu izendatu zuten.

1994/06/27. **Edozein toki da aproposa**. Donostiako erdialdeko San Martin kalean kontzertua eman zuen Negu Gorriak musika-taldeak. Auzitegiaren pare-parean kamioia aparkatu eta hantxe jardun zuten musikariek, intsumisioaren aldeko kontzertuan. Hala, bada, batera gertatu ziren Mikel Cazalis taldekidearen zitazioa eta kontzertua. Ideia hark izan zuen fruiturik, 1994ko uztailaren 14an ere rock kontzertua eman baitzuten Barakaldoko Auzitegiaren parean; orduko hartan, Parabellum taldeko Lino Prieto epaitu behar zutela salatzeko.

1994/09/08. ELBko hirurogei kide Paueko Leclerc supermerkatuan sartu eta **Ossau-Iraty ardi-gazta guztia apaletatik bahitu zuten**, industria-lobbya salatzeko. Gero, **bahitutako gazta Emausko Traperoak elkarteko egoitzara eraman eta han behartsuenen artean banatu zuten**. Bukatzeko, Nekazaritza Saileko (DDA) zuzendariekin negoziatzeari ekin zioten.[165]

1994/10/09. **Lehenbiziko Intsumiso Eguna Oiartzunen**. Kakitzat taldeak antolatu zuen festa hura.

1994/11/23. Asier Gozategiren aurkako epaiketa egiten ari zirela-eta, **erromeria intsumisoa** antolatu zuten Donostian.

1995. **Solidarioak Itoitzekin** taldea sortu zuten. Urte hartan hainbat ekintza antolatu zituzten; hala, adibidez, Ingurumeneko zuzendari nagusiaren bulegoa okupatu zuten, eta Nafarroako Jauregiaren leihoari lotu; Ebroko Konfederazio Hidroelektrikoak Iruñean zuen egoitza hesi-hormaz itxi zuten; eta parodia bat ere egin zuten, Pitillasen zentral nuklear bat eraikitzera balihoaz bezala.

1995/04/21. Bordeleko Infanteriaren Lehen Erregimentuan preso zuten Kittu Lazkarai intsumisoak **gose-greba bati ekin eta uko egin zion bigarrenez uniforme militarra janzteari**. Lazkarai birritan atxilotu zuten, eta **bitan kondenatu**: lehenbiziko aldian, 13 hilabeteko kartzela-zigorra ezarri zioten; eta horren ondotik, berriz, urtarrilean, urtebeteko zigorra jarri zioten, ostera ere Frantziako armadaren aginduari men egin ez ziolako. Bordeleko ospitale

165 Martine Sistiague: *Op. cit*., 211. or.

militarrean zegoela gose-greba bati ekin zion, baina seigarren egunean baldintzapeko askatasuna eman zioten.

1995/05/22. Itoizko urtegiaren eraikuntzan erabiltzekoak ziren **zementubagonetetan zeramatzaten kableei lotu zitzaizkien lau solidario**. **7 ordutik gora eman zuten zintzilik, 150 metrora baino goragora**. Guardia zibilek mehatxu egin zieten, jaisten ez baziren ikusiko zutela; ekintzaileetako bati segurtasuneko kakoa kendu eta ez gora ez behera geratu zen, haren hamakari eusten zioten soketatik zintzilik.

1995/06/04. **Urumea ibaian gora**, Donostiako Loiolako **kuartelean lehorreratu ziren**. Armadari eskainitako astearen barruan, ospakizun militar zeremoniatsu bat egiten ari ziren egun hartan Loiolako kuartel militarrean. Ertzaintzak bilatzeko eta atxilotzeko agindua zuten bederatzi intsumisoetatik bi harrapatu zituen.

1995/07/01. Elkarrik **Madrileko Puerta del Sol-era** atrila eraman eta mitina eman zuen elkarrizketari buruz.

1995/08/21. Europan barrena ibili zen **Karabana Intsumisoa** Donostiatik abiatu zen, euskal intsumisoen berri jakinarazteko. Italiako poliziaren jazarpena pairatu ondotik, karabanako kideek **NATOk Bruselan duen egoitza nagusia okupatu zuten** abuztuaren 28an.

1995/10/19. **Musikariak solidario musikariekin**. Adierazpen-askatasunaren aldeko kontzertua eman zuen *Hitz Egin*ek Oiartzunen. Hamabost musika-taldek jardun zuten kontzertuan, Negu Gorriak eta Esan Ozenki taldeei elkartasuna adierazteko. Izan ere, “Ustelkeria” izeneko kantaren egileen aurka kereila bat jarria zuen ordurako Guardia Zibileko Rodríguez Galindo jeneralak.

1995/11/25. Guztira, Euskal Herriko 23 udalek erabaki zuten **Udal Intsumituen Mankomunitatea** eratzea (EUDIMA). Hala, 1996ko maiatzaren 18an, ofizialki eratu zuten elkartea Oiartzunen.

1995/12/18. **Itxialdiak nahiz baraualdiak, astebeteko txandetan**. Donostiako Artzain Onaren katedralean itxialdi mugagabe bati ekin zioten 600 lagunek; astebeteko txandak eginez, euskal presoak Euskal Herrira ekar zitzatela eskatzeko egin zuten protestaldia. Zazpi egunetik behin aldatuz, 15 lagunez osatutako talde banak barau egin zuen denbora luzez; hilabeteetan, han izan ziren gizarte, kultura, kirol, politika eta sindikatu munduko hainbat ordezkari. Itxita zeudenek beste hainbat ekintza ere egin zituzten; adibidez, 1996ko irailaren 16an hasi eta 22an bukatu, Europako zazpi hiriburutan egin zuten baraualdi kolektiboa: Genevan, Berlinen, Kopenhagen, Parisen,

Lisboan, Bruselan eta Erroman. Artzain Oneko ekimenari milaka pertsona bildu zituen elkarretaratze batek eman zion amaiera 17 hilabete geroago, 1997ko apirilaren 20an.

1996. Urte hartako otsailaren 22an, **nahitaezko soldadutzaren ordez soldadutza profesionala jarriko zutela adierazi zuen Jacques Chirac presidenteak**. Horren harira, Hego Euskal Herriko **gazteen %40 baizik ez zen joaten soldadutzara garai hartan**.

1996. urtetik 1998. urtera bitartean. **"Jendea parte hartzera motibatzeko lehenbiziko ekintzen barruan"**, Autodeterminazioaren Biltzarrak (ABK) sustaturik, **hamaika desobedientzia-kanpaina egin zituzten**. Haietan parte hartu eta materiala banatzeko, hainbat helbide publiko eman zituzten, eta ekintza asko eta asko egin:[166] EH hizkidun pegatinak banatzea, ibilgailuetan jartzeko; billeteetan eskuz nahiz kautxuzko zigilu bidez "Euskal Errepublika" idaztea; Espainiako erregearen zein Frantziako presidentearen aurpegia buruz behera ageri zuten zigiluak banatzea; Espainiako nahiz Frantziako selekzioekin parte ez hartzeko deialdiak egitea; eragozpen fiskala bultzatzea; Espainiako erregearen mendeko izateri utzi nahi zitzaiola idatzita zuten postalak banatzea; soldadutzari desobeditzea; ezein estatu-ordezkariren aurrean, agiri guztiak euskaraz baizik ez betetzea; euskal nortasun-agiria egitea; euskararik ez zerabilten multinazionalei boikota egitea; A-8 autobideko ordainlekuetan desobedientzia sustatzea.

1996/02/15. Itoitzekin Solidarioak taldeko kideek **parodia bat egin zuten** Nafarroako Jauregiaren **teilatuan**, fidantza bat ordaintzen ari balira bezala (izan ere, Auzitegi Nazionalak 24.000 milioi pezeta eskatu zituen, urtegiaren obra bertan behera utziko bazuten).

1996/03/09. ETAk bere Alternatiba Demokratikoa agertzen zuen bideoa eman zuen Elkarrik. Hauteskunde-kanpainan hartaz baliatzeko asmoa zuen Herri Batasunak, baina zentsura egon zen, hura telebistaz ematea galarazi baitzieten. Beraz, Elkarrik ez zuen era hartara jokatu edukiarekin ados zegoelako, **gatazkan sartuta zeuden aldeek elkarri entzun behar ziotela sinetsita baizik**. Auzitegi Gorenak, ordea, oso bestelako iritzia zuen: Herri Batasuneko Mahai Nazionaleko kide guztiei "talde armatuarekin kolaboratzea" egotzi, eta hargatik buruzagi abertzale guztiak atxilotzeko agindu zuten. Otsailaren 7an, Elkarrik Donostian egindako emanaldi batean, Ertzaintzak beste kopia bat konfiskatu zuen. Hala ere, beste hainbat eragile prest azaldu ziren bideo hura emateko; bide hori urratuz soilik lor omen zitekeen gatazkaren konponbidea

166 *Creando la Euskal Errepublika. Desobedeciendo, ejerciendo la autodeterminación*. Euskaraz eta gaztelaniaz argitaratutako zortzi orrialdeko esku-orria.

eta elkarrizketa-giro aproposa. Martxoaren 4an, beste hainbat kopia konfiskatu zituzten. Urtebete geroago, 1997ko irailaren 21ean eta 22an, ehunka pertsonek erruduntzat jo zuten beren burua; **pertsona horiek guztiek beren gain hartu zuten Alternatiba Demokratikoa ageri zuen bideo hura ikusi eta zabaldu izana**. Iruñean ere babestu zuten ekimena, 1997ko urriaren 25ean.

1996/04/06. **Kableak ebaki zituzten Itoitzen**. Goizeko zazpiak eta laurdenetan, Itoitzekin Solidarioak taldeko zortzi kidek[167] **kable nagusiak ebaki eta urtebetez gerarazi zituzten urtegiaren obrak**. Hantxe ziren, tartean, hainbat kazetari ere. Ekintzaileek motozerra izpidunak erabili zituzten, bai eta lan-jantzi aproposak ere, bularraldean "Itoitz Deseraikuntzak" idatzirik. Ekintza hark polemika handia sortu zuen –tartean, baita urtegiaren aurka zeudenen artean ere–, denek ez baitzuten argi ikusten haren doitasuna, pentsaturik, agian, ekintza hura ez zela sartzen, estu-estu, indarkeriarik gabeko sabotaje mota baten eskemetan. Hara nola gertatu ziren gauzak:

> "Aste Santuko egun haietan protestazko kanpaldi bat egin zuten urtegiaren aurka. Protestaldia egun haietan egitea erabaki bazuten, obran inor egongo ez zela ziur zekitelako izan zen. Hormigoia urtegiko edozein tokitara garraiatzeaz arduratzen zen sistemaren sei kableak ebaki zituzten; huraxe izan zen haien ekintzaren gakoa. Kableen neurria ez zen nolanahikoa: 800 metro luze, 62,5 milimetro lodi eta 140 tonarainoko zamari eusteko moduko oinarria. Datu horiek, noski, ideia halako bat eman dezakete, kable haiek zenbateko tentsioari euts ziezaioketen. Obran ezarria zuten lan-erritmoa ikaragarria zen: egunero 4.200 metro kubiko hormigoi (700 kamioi inguru, gutxi gorabehera) botatzen zen obran; ekintzaileek saboteatu zuten lur-sailean batez ere, **hura baitzen obraren ernamuina**. Ekintzarako, lanak zaintzen zebilen zinpeko guardia bat menderatu behar izan zuten Solidarioek; esku-hankak lotu eta arma kendu zioten –haren garitaren sabaian utzi zuten pistola–. Esan gabe doa, noski, guardia hari ez ziotela minik eman; esan beharra dago, halaber, hura izan zela atxilotuei tratu txarrik eman ez zien zinpeko guardia bakarra, eta are haietaz kezkatu eta arduratu zen pertsona bakarra, gainerako zinpeko guardiek emandako jipoi itzelekoaren ondorioz larriki zaurituta lurrean zeutzanean. Kazetariek bideoz jasotako irudietan ikus daitekeenez –ez ahaztu bideo hura frogatzat onartu zutela ondotik etorri zen epaiketan–, zinpeko guardia hura muturrez aurrera erori zen lurrera, oinari lotuta zegokion soka-zatitxo bat zapalduta. Gobernuaren delegatuak emandako bertsioa baliogabetzen dute irudi horiek; haren arabera, izan ere, guardiak sekulako jipoia jaso omen

167 Itoitzekin Solidarioak taldeko kide hauek jardun zuten ekintza sonatu hartan: Urko Hernández, Ramón Hernández, Ibai Ederra, Ignacio Erviti, Iñaki García Koch, Pedro Miguel Lugarreta, Julio Villanueva eta Txomin Yubero. Gehiago jakin nahi izanez gero, ikus hemen: "No vimos otra opción que cortar los cables", *Gara* egunkaria, 2007ko abenduaren 24.

zuen; baina, nolanahi ere, bertsio hura guztiz funsgabea ez ezik, hedabideetan zabaltzea beste helbururik ez zuen gezur interesatua ere bazen.

“Ikuskizun harrigarria izan zen hura. Sei kableak sugarretan erori ziren lurrera, eta harrapatzen zuten gauza oro herrestan eraman zuten. 3 minutu baizik ez ziren behar izan 6 hilabeteko lana pikutara botatzeko –arduradunen arabera, izan ere, 6 hilabete inguru eman zuten obraren instalazioa jartzen–. Bideoan argi eta garbi ikus daitekeenez, kableak ebakita, Solidarioek aurpegia agerian utzi eta 5 minutu-edo egon ziren zain, Guardia Zibila noiz etorriko. Haien asmoa ez baitzen, inondik ere, ihesi alde egitea, ez eta poliziari aurre egitea ere. Hala, bada, segurtasuneko indarrak iritsi zirelarik, zerrak eta gainerako tresnak lurrean utzi eta eskuak altxa zituzten, harik eta lurrean etzanarazi zituzten arte. Denak lurrean ahuspez etzanda eta esku-burdinaz lotuta zeudenean, zinpeko guardiek atergabe jo zituzten, gogor, oso gogor, han ziren guardia zibilek txintik ere esaten ez zutela. Ordubete iraun zuen jipoi hark; ez zuen etenik izan: kolpeak, makilakadak, ostikoak, mehatxuak... zer ez zuten egin, alajainkoa! Bien bitartean, berriz, guardia zibilek lurrean etzatera behartu zituzten kazetariak, eta orobat beste alde batera begiratzera; argazkiak ere kendu zizkieten, bai eta kameraren bat hautsi ere. Jipoi ikaragarri haren ondorioak aski nabarmenak izan ziren: ostikoz lehertutako belarri-mintz bat, kolpe izugarriak bizkarrean, lesioak bi hanketako tendoietan, buruko zein barrabiletako kolpeak... Azkenik, Agoizko kuartelera eraman zituzten.

“Hori guztia gertatzen zen bitartean, urtegiaren aurkako kanpaldian, batzar bat egin eta ehunen bat lagun kuartelera joan ziren, atxilotuei babesa erakusteko. Goizeko 10ak inguruan askatu zituzten lanean ari zirela atxilotutako kazetariak. Haiek ere pairatu behar izan zituzten nahikoa iseka, umiliazio eta laido; ez hori bakarrik, ordea, argazkiak-eta hautsi ere egin baitzizkieten; eta hori gutxi balitz bezala, dirua ere lapurtu zieten; hala, denek erabaki zuten Protecsa segurtasuneko enpresaren aurkako salaketa jartzea, gertuen zuten epaitegian. Zortzi atxilotuek zain egon behar izan zuten, harik eta Guardia Zibilaren furgoian deklarazioa hartu zitzaien arte. Beraz, jipoi basati hura jaso ostean, esku-burdinaz loturik, zortzi ordu baino gehiago eduki zituzten furgoian sartuta, eguzkitan. Han sartuta eduki zituzten denboran guztian zehar, ez zieten ez jaten ez edaten eman. Agoizko Epaitegian, atxilotuek euskaraz deklaratzeko asmoaren berri eman zioten epaileari, baina itzultzailerik ez zegoela-eta, espetxean preso sartu behar zituztela erabaki zuen hark”.[168]

1996/05/01. Preso intsumisoak **biluzik kartzelatan, manta bat baizik ez zutela,** Irlandako preso errepublikanoen ekimen pareko bati jarraituz. Zigor-kode berriaren aurkako protestaldia izan zen hura, bai eta beren eskubide

168 http://www.alasbarricadas.org/noticias/

zibilen aldeko ekimena ere, eta orobat gizarte desmilitarizatu baten aldeko oihua: “Larru gorritan nahi gintuzten, eta halaxe gauzkate”.

1996/06/23. Langraizeko **Expal bonba-fabrikaraino martxa antimilitarista** egin zuten.

1996/06/31. **Irungo alarde diskriminatzailean parte hartzen saiatu ziren hainbat emakume**; ospakizun hartan, ordea, kantineraz jantzita baino ez zituzten nahi emakumeak. Alardea hasi eta denbora gutxira, emakumeei nahiz haiek babesten zituztenei eraso egin zieten, gogor: harrika eta isekaka, alegia. Antzeko moduz egin zieten eraso beste hainbat emakumeri Hondarribiko alardean, irailaren 8an. Handik urtebetera, emakumez eta gizonez osatutako konpainia bat sortu zuten Irunen; zegokien baimena lortzeaz gain, haien aldeko epai bat ere erdietsi zuten, baina ez udalaren onarpena. Konpainiak ibilbide osoa egitea lortu zuen, baina bakarrik. Hondarribian ere eredu harixe jarraitu zitzaion, eta hala, emakumeek desfilean parte hartzea lortu zuten –kostata, ordea–. Hala ere, ez zieten utzi Alarde nagusian desfilatzen. 2000. urtean jada, 800 gizon-emakumek parte hartu zuten Irunen, berdinen arteko Alardean.

1996/08/20. **Edozein toki da ona kanpaldi bat egiteko**. Nafarroako gobernuak ez zuen Itoizen kanpaldia egiteko baimenik eman, eta polizia bidali zuen hara, edozein ekintza galarazteko. Kanpaldia, ordea, **herriko etxebizitzetan egin zuten**. Era berean, 1996ko abuztuaren 20an, Solidarioek **kanpaldi bati ekin zioten Iruñeko Foruen estatuan**.

03/11/1996. KEM-MOC taldeak Zigor Kode berria **“aplikaezin” bihurtzearen aldeko apustua** egin zuen.

05/12/1996. Bilbon egitekoak ziren epaiketa batean, abokatu euskaldunek **protesta egin zuten**. Euskal Kulturaren Batzarrak emandako datuen arabera, epaileen %95ek ez daki euskaraz hitz egiten.

1996ko abenduaren 24 eta 25. Itoitzekin Solidarioak taldeko kideek **kanpaldia egin zuten** Iruñeko kartzelaren aldameneko **zuhaizpe batean**, obrak geraraz zitzatela eta Daniel Unziti aske utz zezatela eskatzeko.

1997. Urte hartan, **errekluta baino eragozle gehiago egon zen Nafarroan**.[169] Kartzelak intsumisoz bete ziren, baina denek ez zuten berdin eraman.

169 “Eragin berezia izan zuen intsumisioak Nafarroan; hainbat arrazoi izan ziren tartean: batetik, antimilitarismoa nagusi izan da historikoki lurralde horretan; bestetik, berriz, NATOn sartzeari ezetz esan zion gehiengo batek; eta bazegoen, halaber, sentipen abertzale halako bat, intsumiso asko egotea errazten zuena. Horri guztiari gehitu behar zaio, orobat, sekulako jazarpena egon zela Nafarroan. Hemen mundu guztiari egin zitzaion epaiketa. Milaren bat intsumisori buruz ari gara hizketan. **Hainbat herritan, inork ez zuen soldadutzarik egiten; mendialdeko herrietan batez ere. Hainbat haranetan, adibidez, intsumisioa erabatekoa zen**. Talde antimilitaristek lan eskerga egin zuten landa-eremu horietan. Identitatearen inguruko arazoak ere lagundu zuen, noski,

Iruñeko espetxean hirugarren graduko zigorra betetzen ari zen **Unai Salanueva** intsumisoak bere burua bota zuen etxeko leihotik, eta otsailaren 10ean hil, kartzelara itzuli baino lehenago. 2.000 pertsonak omenaldi beroa egin zioten, eta salatu "kartzelak berak hil zuela". Ez zen hura kasu bakarra izan: irailaren 2an, **Kike Mur Zubillaga** intsumisoa hil zen Zaragozako Torreroko kartzelan, ustez bere buruaz beste egin nahi zuela-eta, hainbat substantzia irentsi ostean. Haren kideek salatu izan dutenez, "kartzelariek eta medikuek hiltzen utzi zioten, batere laguntzarik ez baitzioten eskaini; kartzelako lagunok baino ez genion lagundu".[170] Salaketak artxibatu egin zituzten. Hala ere, garai hartan "azken putzaren sindromea" [171] erruz ugaritu zen; hala, bada, gizartean zernolako sentiberatasuna zegoen ikusirik, hainbat epailek zigor-kodeko kondenak jartzeari uko egin zioten. Urte hartan, halaber, **kuarteletako desertzioa** hasi zen: martxo hartan bertan, adibidez, sei desertore –tartean, bi nafar– Madrileko Gobernu Militarraren aurrera agertu ziren.

1997. **Intsumisoak lanetik botatzeari uko egin zioten** EHUk eta beste hainbat erakundek.

1997. Ipar Euskal Herrian nekazaritza-ganbera eskatzeko bide malkartsuan**, balizko Euskal Herriko Nekazaritza Ganberara taloi bakoitzeko 500 frankoko tasa bidaltzea** erabaki zuten 200 laborarik; haietako bakoitzak estatuari ordaindu beharreko diru kopurua, alegia. Eragina ere izan zuen ekimen hark, Pauko legebiltzarrak itzeleko iskanbila sortu baitzuen; Frantziako nekazaritza ministerioak, berriz, mehatxu egin zien euskal laborariei. Hainbat kide presioen ondorioz ahultzen ari zirela ikusirik, ekimena amaitutzat ematea erabaki zuen ELBk, **denek batera bukatzea oso garrantzitsutzat jotzen baitzuten**.

1997/01/31. Indarkeria-ezaren Egunean, **Gandhiren gisan izarak soinekotzat jantzirik**, sei intsumisok **besoak kateatu zituzten hodi batzuetara**. Bilbon izan zen kateaketa, armadarentzat lan egiten zuen enpresa baten geletan. Ertzainek ordubete baino gehiago behar izan zuten haiek askatzeko. Azkenean, atxilotu egin zituzten.

1997/02/19. **Intsumisioa kuarteletan**. KEM-MOC taldeko Iruñeko kide Ignacio Ardanaz Ruiz "Tasio" antimilitarista **Aitzoaingo kuartelera abiatu**

---

euskaldunak baitira nagusi leku horietan. KEM-MOC taldearen diskurtsotik dezente urruntzen den arren, ezin dugu ukatu identitatearen gaineko kontu horrek ekarri zuela gure ekintzen arrakasta" (Intsumiso izandako Fernando Mendiola eta Manolo Nogueras taldekideei egindako elkarrizketa, *Diagonal* aldizkaria, bigarren hamabostaldia, 2009ko otsaila).

170 Josu Arteagak El Corazón del Sapo musika-taldeko kideei egindako elkarrizketa, *Ekintza Zuzena* aldizkaria, 24. Haiek, izan ere, intsumiso izateagatik urtebeteko kartzela-zigorra betetzen ari ziren Zaragozan. Beraz, Kike Mur gertutik ezagutu zuten.

171 Pedro Oliver: *Op. cit*

**zen**, haraxe bidali baitzuten soldadutza egitera. **Bi egun geroago, ordea, egokitu zitzaion unitatetik desertatu zuen**. 15 egun ezkutuan eman eta gero, martxoaren 6an agertu zen Madrileko Gobernu Militarraren aurrera; han ziren, harekin batera, Alberto Isaba Lakabe eta beste hiru desertore ere. Beren burua intsumisotzat aitortu zuten epaile militarraren aurrean, eta desobedientzia zibileko ekimen andana baten berri ere eman zioten. Errepresioaren arduradun egin zituzten militarrak, jurisdikzio zibilaz baliatzerik izan ez zezaten. KEM-MOC taldearentzat zeharo beharrezkoa zen armadari eta defentsa-politikari buruzko eztabaida sortzea: norengandik babestu behar dugu? Zer-nolako baliabideak erabili behar ditugu?... 1998ko urtarrilaren 1ean, Epaitegi Militar batek juzgatu zuen A Coruñan Ignacio Ardanaz, eta 2 urte eta 4 hilabeteko kartzela-zigor militarra ezarri, desertzio delitu bategatik. Beste epaiketa batean ere juzgatu zuten, lokal militar batean legez kanpo sartzeagatik.

1997ko apirila. **Kalamudia taldeko kideek landatze publikoak egin zituzten**. Kalamua ikertzea eginbide nagusi duen talde horrek **Drogaren Aurkako Fiskaltzari jakinarazi zion kalamua jendaurrean landatzeko asmoa zutela**, landarearen legezko normalizazioa eskatzeko. Arrankudiagan egindako landatzean, 200en bat lagun bildu ziren; han ziren, tartean, lau alderdi politikotako kideak, ESK eta CCOO-ko sindikalistak, kazetariak, drogamenpekotasunean aditu ziren teknikariak, aktoreak, musikariak, eta, oro har, kalamuaren erabilera medikoa bultzatzen zuten hainbat pertsona. Administrazioak, ordea, dilijentziak ireki zituen osasun publikoaren aurkako ustezko delitu bategatik, baina handik gutxira artxibatu zituzten; hala, bada, legearen trabarik gabe landatu ahal izan zuten kalamu-uzta hura. 1999. eta 2000. urteetan, ostera ere ekimen horrixe berari ekin zioten Abadiñon; hedabideei ere jakinarazi zieten ekintza hura egitera zihoazela, baina orduko hartan ez zen parte-hartze judizialik izan

1997/04/12. KEM-MOC taldeko hainbat kide Soietxeko **kuartelean sartu ziren**, banderaren zina egiten ari ziren bitartean. Nafarroako intsumiso talde batek ere gauza bera egin zuen apirilaren 26an: Aitzoaingo kuartelean sartu eta **teilatuetako bat margotu zuten**.

1997/04/17. Ipar Euskal Herrian, Euskal Herriko Laborarien Batasuna (ELB) sindikatuak aditzera eman zuenez, **artean sortzeke zegoen Euskal Herriko Nekazaritza Ganberari baizik ez omen zion zergarik ordainduko**. Paueko legebiltzarrak, ordea, banan bana ukatu zituen sindikatuak egindako proposamenak, tartean, batez ere, nekazaritza iraunkor baten aldeko

eredu berri bati nahiz horren oldarkorra izango ez zen laborantza mota bati zegozkion proposamenak.

1997/05/16. **Hori bai umorea "etsaiarena"**. Gobernuak Nafarroan zuen delegatu Javier Ansuáteguik **baldintza bat jarri zuen egun haietan egitekoak ziren martxa antimilitarista bati baimena emateko: "Intsumisioa" ez oihuztatzea, alegia**. Azkenean, istilurik eta izurik gabe egin zuten manifestazio hura.

1997/09/02. Euskal Herrian Euskaraz (EHE) elkarteko sei kidek **epaiketa bat eten eta euskarazko Justizia bat eskatu zuten**. Epaiketa hasita zegoela, tribunal hura ez zutela aintzat hartzen esan zioten ekintzaileek epaileari. Etenaldi haren ondorioz, beste epaiketa bati egin behar izan zioten aurre. Irteeran, desobedientzia zibilaren aldeko adierazpenak egin zituzten.

1998/03/07. Donostiako Loiolako **kuarteleko kanoietan preserbatiboak jartzen saiatu** eta haiei lotu zitzaizkien. "Armadaren aurka, babes zaitez" izeneko ekimen antimilitarista izan zen hura. Helburua erdietsi ez zuten arren, gune militarrean sartu eta lau mutilez eta neska batez osatutako taldeak lortu zuen bere eskariaren berri ematea. A Coruñako Epaitegi Militarrean egin zieten epaiketa 1999ko azaroan; hura **diktaduraren ostean egindako lehenbiziko epaiketa militarra izan zen**.[172] Orduko hartan akusatuek adierazi zutenez, armadari ematen zitzaion diru kopurua helburu sozialetara xeda zezaten eskatzea izan zen beren helburu nagusia.

1998/03/19. Kataluniako parlamentuan, **hiru okupak Espainiako bandera jaitsi eta haren ordez okupen bandera bat goititu zuten**. Parlamentuan osoko bilkura bat egiten ari zirela aprobetxatuz, Joan, Claudio eta Montserrat Jauregiaren gorenera igo ziren. Talde mistoaren bulegoan sartu eta han inor ez zegoela ikusirik, barruan itxi eta protesta-pankarta bat eskegi zuten leihotik bera; gero, bandera-makila zegoen lekura jo zuten, eta han Espainiako bandera jaitsi eta okupa-mugimenduaren bandera jaso zuten. Mossos d'Esquadrako kideek ordu erdi luze behar izan zuten teilatura igo eta atzera ere jatorrizko bandera goititzeko. Hiru okupak atxilotu zituzten.

1998/07/15. **Egunkari bat itxi zuten, baina hurrengo egunean kalean zen beste bat**. Ehunen bat polizia sartu ziren gauez *Egin* egunkariaren eta *Egin* irratiaren egoitzetan; bi hedabideak itxi eta egunkaria egiteko beharrezkoak ziren hainbat pieza eraman zituzten. Administrazio-kontseiluko hamaika lagun ere atxilotu zituzten. Goizean, langileen batzarrak egunkari berri bati ekiteko asmoa azaldu zuen, eguneroko lanari hutsik egin gabe.

172 *El Mundo* egunkaria, 1999ko azaroaren 24.

Horretarako bitartekoen bila hasi ziren berehala. Beste egunkari batek lokalak utzi eta erredaktore gutxi batzuk lanari ekin zioten. Horrela bada, beste egunkari bat plazaratzea lortu zuten: *Euskadi Información* izenekoa, alegia. Beste egunkari bateko langileak prest zeuden egunkari berria gehigarri gisa orri artean banatzeko. Dena dela, azkenean inprenta batean argitaratzearen alde egin zuten. Ez zen, noski, erraza izan, baina gogor ekin zioten gaueko lan hari. Denek jardun zuten gogor: astekari batek papera eman zien, eta plazara ateratako lau orriak barra-barra fotokopiatu zituzten hainbat egunkari-saltzailek. Egunkariak, beraz, ez zion hutsik egin irakurleekin zuen hitzorduari, eta halaxe jarraitu zuten ondorengo egunetan ere. Herritar batek bere lokalak utzi zizkien langileei, egunkaria lasai argitara zezaten. Egunetik egunera, pixkana-pixkana, egunkariaren orri-kopurua ere handituz joan zen; eta horrekin batera, diru-funts bat ere bildu zuten, eta hala, egunkari berri bat egiteari ekin; saiakera haren emaitza sei hilabeteren buruan, 1999ko urtarrilean, ikusi genuen: *Gara*.

1998/09/20. **Agoitz eta Nagore batzen zituen errepidea eraikitzeko ardura zuten bi enpresen tresneria guztia hautsi zuten Itoitzekin Solidarioak taldeko bi emakumek**. Hurrengo egunean, zaintzaldiko epailearen aurrean beren burua entregatu zuten bi-biek, eta epaileak haiek atxilotzeko agindu zuen. Epaileari honela adierazi zioten: “Urtegiaren obrak gerarazteko egin dugu ekintza. Lurra zaindu nahi baikenuen, makinak hautsi ditugu: kilometro eta kilometroetan gure oihan, baso eta errekak suntsitzen ari diren munstrotzar horiek, alegia”. Salaketa bat ere egin nahi izan zuten: “Epaileak zikin ari dira jokatzen; izan ere, batetik obra gerarazten dute; bestetik, ordea, hura eraikitzen jarraitzeko baimena ematen dute”. Makina haietatik 30 puskatu zituzten, haien motorretan txirbilak sartu baitzituzten; ezin kalkulatuzko kalteak eragin zituzten.

1998/10/10. Mexikoko Pilota Txapelketan parte hartzeko hautatu zituzten pilotariek Anoetako Manifestua sinatu, eta adierazi zuten euskaldun gisa baizik ez zutela jokatu nahi.

1998/10/11. 15.000 gaztek baino gehiagok parte hartu zuten Usurbilgo Intsumisio Egunean.

1998/10/13. Epaiketa batean euskaraz juzga zitzatela eskatzeagatik akusatu zituzten sei gazteek **uko egin zioten epaiketara joateari**; Donostiako Auzitegiaren parean jarri ziren pankarta batekin, Justizia euskaldundu zezatela eskatu eta, hizkuntza-arrazoiak tarteko, pairatu behar izan zuten babesik eza salatzeko.

1998/10/22. **Desobedientzia zibil elektronikoa**. *El Pais* egunkariko *ciberp@ís* gehigarrian[173] *Electronic Disturbance Theatre* izeneko ekimenaren eta beste antzeko batzuen berri eman zuten. 1997an, Mexikoko gobernuaren webgunean sartu eta hainbat aldiz *reload* egitera –hots, hura behin eta berriz kargatzera– zirikatu zituen herritarrak ekimen hark, **webgunea buxatzeko**. Egunkarian aipatzen zenaren arabera, **ikerketa atomikoan ziharduen Indiako laborategi bateko ordenagailuei ere eraso egin zieten, herrialde hartan egiten ari ziren proba nuklearren aurka protestatzeko**. Liburu baten berri ere eman zuten: *Electronic civil disobedience* izenekoa, alegia. Liburu horretan esaten denaren arabera, "kaleetatik ziberguneetara igaro da boterea; beraz, protestak ere haraxe eraman behar ditugu, eta benazko munduan desobedientzia zibilaz baliatu direnen taktika berberak erabili: 'iraindu eta blokeatu', alegia".

1998/12/23. **Eguberri bezpera**. Presoekin Elkartasun Taldea-Solidarios con los Presos taldeko kideek ekintza deigarria egin zuten Algeciraseko kartzelan. **Olentzero bat leihoetako bati lotu eta antzezpen halako bat egin zuen, pikotx batez espetxeko murruak txikituko balitu bezala**; Polizia Nazionalak atxilotu zuen. Baserritarrez jantzitako beste bi kidek pankarta bat zabaldu zuten, presoak Euskal Herrira gertura zitzatela eskatzeko.

> "Gure zereginetako bat poliziak lasaitzea izan ohi da; hau da, haiei jakinaraztea ez dela ezer txarrik gertatuko, gure ekintzak baketsuak direla, gure aldetik ez dela batere indarkeriarik egongo (...) Guk ez diegu aurre egiten; are gehiago: zenbaitetan haiekin hitz egiten dugu; honela esaten diegu: 'gu bake asmoz gatoz', 'zuek lanean ari zare, badakigu'; bai horixe, askotan azalpenak ematen dizkiegu (…) Dena den, gutxieneko kolaborazioa haien eta gure artean. Haiek etorri, eta gure nortasuna adierazten diegu; nolanahi ere, gurea beti da erresistentzia pasiboa (...) Bi arrazoigatik jokatzen dugu horrela: batetik, istilutan sartuko bagina, atxilotuko bagintuzte, batzuk espetxean sartuko balituzte, gutako asko eta asko erre eta akabo dena; bestetik, berriz, uste osoa dugulako, gure filosofia honen bidez, herritarrak erakartzeko moduko ekintza goxoen bidez, askoz ere jende gehiagorengana irits gaitezkeela; hala, gizarteko sektore zabal bat erakarri, eta jende gehiagoren kontzientzia zirika daiteke. Guk geuk nahi dugu, beste inork baino gehiago, poliziak lasai egon daitezen; haiek erasokor etorri ohi baitira beti; eta horrek, jakina, beste itxura bat har lezake gure jarrera bestelakoa balitz".[174]

173 *El País* egunkaria, 1989ko urriaren 22: "El movimiento 'pirata' se politiza. El hacktivismo extiende la desobediencia digital", *Ciberp@ís* gehigarria, 13. or. Hainbat helbideren berri ematen dute; besteak beste, Electronic Civil Disobedience, Critical Art Ensemble elkartearen hau: mailer.fsu.edu/~sbarnes/ECD/ECD.html

174 Eva Forest: *Manual de solidarios*, Hiru, Hondarribia, 1999, 47., 48., 101. eta 102. or.

1998/12/26. Bai Euskarari elkarteak sustaturik, 118.000 lagun joan ziren **Euskal Herriko bost futbol-zelai nagusietara**, aldi bereko ehunka ekitaldi ikusteko.

1998/12/31. Dispertsioaren aurkako hainbat **elkarretaratze** egin zituzten **isilean** 73 herritan; azken urteetako parte-hartze handiena eta askotarikoena lortu zuten, tartean baitzeuden, lehenago ez bezala, PSE eta EAJko kideak ere.

1999. Beste hainbat pertsonarekin batera, Barrigan anaiak ostera ere borrokan. Estatu Batuetako hegazkin-base batean sartu, eta **erasorako bi hegazkin A-10 mailuka txikitu zituzten**. Gero, margo gorria bota zioten, odola balitz bezala. 30 hilabeteko kartzela-zigorra betetzera kondenatu zituzten, konspiratzea eta ondasunak suntsitzea leporatuta. 2001eko abenduan aske utzi zituzten.[175]

1999/02/03. **Lemoiztik Ascó IIra 100 tonako alternadore bat garraiatzen ari zen segurtasun handiko konboi nuklearra hiru orduz gerarazi zuten**. Guardia Zibilak eta Prosegur enpresako kideek eskoltatutako trailerra orduko 4 kilometrora zihoan. Beraz, hura oztopatzeko, ezustean harrapatzea beste erremediorik ez zegoen. Greenpeaceko 4 kidek horrela egin zuten Tarragonan, 6 ordu esperoan egon ostean, furgoneta batetik jauzi eginda:

> "Orain! esan zuen baten batek, eta atzeko ateak ireki ziren, ekintzaileek jauzi egin zezaten; haiek argi zuten zein zen helburu nagusia: ibilian zihoan kamioia gerarazi eta alternadoreari eusten zioten kateei estu lotzea. Segundo gutxi batzuk igarota, zaintzaileak harriduratik nola edo hala esnatu, eta gertatzen ari zenaz jabetu ziren... Ordurako, ordea, bi ekintzailek pankarta bat zabaldu zuten alternadorearen aldamenean. Txoferrak kamioia gelditu, eta segurtasuneko guardiek jauzi egin zuten ekintzaileen gainera. Kateei torlojuak kendu, eta ekintzaileak askatu zituzten (...) dena dela, Prosegurrekoek bultzaka, isekaka eta kolpeka eraso bazieten ere, ekologistak etengabe lotzen zitzaizkien kamioiaren puntu sendoenei (...) Azkenean, Guardia Zibilaren destakamendu bat agertu zen, eta zenbait guardiak konboia inguratu zuten, ekologistek ostera ere lehengoari ekitea galarazteko (...) Lan zailagoa izan zen kamioiaren hainbat punturi loturik zegokien ekintzaileak askatzea. Suhiltzaileei laguntzeko eskatu behar izan zieten... Istiluak sortzeagatik atxilotu zituzten ekologista haiek".[176]

1999ko martxoa. **Greenpeacek** zortziehunen bat metro koadroko **lur-sail txiki bat erosi zuen Itoitzen**, Irati ibaiaren aldamenean. Han edukiontzi bat

175 "Un pacifista de armas tomar". "El Mundo" del 08/12/2002. Philip Berrigan, ex sacerdote y activista antibélico, es detenido un centenar de veces a lo largo de su vida. Muere en Baltimore el 30/11/2002.

176 *Greenpeace* agerkaria, 49, I/99: "Bloqueo al megaconvoy nuclear", 6. eta 7. or.

kokatu zuten, eta hura egonleku iraunkortzat erabili, herritarrei babesa agertu, eta “urtegian bertan egonik, han egin nahi duten izugarrikeria salatzeko”. 2003ko urtarrilera arte iraun zuen etxetxoak, harik eta Nafarroako Gobernuak kenarazi zuen arte.

1999/04/05. Polizia Nazionaleko agenteek zaintzapean zuten arren, **Kadizko Puerto Realeko Ospitalean gaixo zeukaten Esteban Nieto presoaren gelan sartzea lortu zuten** Presoekin Elkartasun Taldeko bost kidek. Nietoren oheari lotu, eta gaixotasun larria zuten presoen askatasuna eskatu zuten. Beste kide bat teilatutik zintzilikatu zen soka batzuez baliaturik, eta ikurrina bat jarri zuen han, bai eta bandera bat ere “Euskal Presoak Euskal Herrira” idazkunarekin. Den-denak atxilotu zituzten.

1999/04/17. Ordainlekuak kolapsatu zituzten **A-8 autobidean** egindako protestaldian.

1999/07/17. Autodeterminazioaren Biltzarrak (ABK) taldeko kideek **Konpantzia okupatu eta uhartea “lurralde aske” izendatu zuten**. Ekintza haren bidez, subiranotasunaren aldeko desobedientzia zibilarentzat aro berri bati ekin nahi izan zioten, euskal errepublika subirano batera eramango zuen prozesu demokratikoa abiaraziz. Beste hainbat ekintzaren artean, Espainiako Erregeari postal bat igor ziezaietela eskatu zieten ABK-ko kideek herritarrei, eta hartan idatz zezatela “haren mendeko izateari uko” egiten ziotela, eta beraz, “haren basailuen zerrendatik” ezaba zitzatela.

1999/08/12. **McDonald’s bat Millaun,** Frantzian. Hormonadun haragiari lotuta egoteaz gain, multinazionalek gidatutako munduaren uniformetasun erabatekoaren sinbolo ere bada ezinbestean McDonald’s enpresa, haren etsaien arabera. Beraz, Millauko lokala piezaz pieza txikitzea erabaki zuten. Ardi Esnearen Ekoizleen Sindikatuak deitu zuen ekintza hura egitera, Europako Batasunak hormonekin tratatutako AEBko behi-okela inportatzeari uko egin ostean, iparramerikarrek roquefort gaztaren aurka hartutako errepresaliak arbuiatu eta haien aurka protestatzeko. Conféderation paysanne elkarteko bost kide atxilotu zituzten hasieran; eta gero, berriz, José Bové bera atxilotu zuten:

> “Egunargi betean egin genuen indarkeria-ezazko ekintza hura oso izan zen sinbolikoa; dena dela, agintariak jakinaren gainean zeuden. Izan ere, aurrez azaldu genion gure asmoa Segurtasuneko Zuzendaritza Nagusiari: McDonald’s-a piezaz pieza txikitzeko asmoa genuela, alegia (…) 10 polizia agertu ziren, bada, hainbat argazki-kamera zituztela; horixe izan zen nabarmenena. Horrela bada, manifestazioa egin genuen, eta denak hasi ginen –bai eta haurrak ere– lokaletik gauzak ateratzen: ateak, takilak, entxufeak, sabaiko hainbat xafla –bide batez, esan deza-

> gun oso erraz ken daitezkeela xafla horiek, material aurrefabrikatuez egindakoak baitira; ezdeusak, beraz–, eta abar. Traktoreen atoietan bildu genituen gauza guztiak, eta bitartean McDonalds-eko sabaia hornitu zuten gutako zenbaitek (…) Geroago, Prefekturara eraman genuen zama guztia. Haurrak, jakina, zarataka ari ziren; 'Bronxeko danbor' haien antza zuen danbateko itzeleko hark (…) Prefekturaren aurrean deskargatu genuen atoia (...) France Presse agentziak arpilatzea aipatu zuen (...) eragindako kalteak milioi bat franko ingururainokoak izan zirela (...) Akusazioak, berriz, nabarmen askoak: 'txikizioak, mehatxuak eta doilortze morala'; baldintzapeko kartzela-zigorra ezarri zieten denei".[177]

1999/08/20. **Giraldillek protestaldia egin zuten 60 telebista-kateren aurrean.** Sevillako Munduko Atletismo Txapelketa egiten ari zirela, ekintza ikusgarria egin zuten. Presoekin Solidarioak taldeko hainbat kide estadioan sartu, eta haietako batzuk harmailetatik zintzilikatu ziren pankartekin. Bien bitartean, txapelketako bi maskota –giraldilla izenekoak, alegia– **eszenatokira igo ziren**, "Presoak Euskal Herrira" (*Repatriation of basque prisioners*) bularraldean idatzita zutela; 20 minutu inguru eman zuten han gainean, **aurkezleekin eta musika-taldearekin batera dantzan**, irekiera-ekitaldi nagusi hartan; herrialde askotako telebista-kateek eman zuten ikuskizun hura. Hamaika solidario atxilotu zituzten. 2000ko ekainaren 16an jakinarazi zuten sententzia. "Istiluak eragitea" leporatzen zieten, baina absolbitu egin zituzten; hala ere, haietako biri sei hilabeteko eta urtebeteko kartzela-zigorra jarri zieten hurrenez hurren, "erresistentzia" eta "agintarien aurkako atentatua" leporatuta.

1999/10/25. **Goraino**. Itoitzekin Solidarioak taldeko zortzi kidek ekintza ikusgarriak egin zituzten Europan barrena. Horrela bada, ekintzaileek beren fidantzapeko askatasuna hautsi, eta Itoizko urtegiaren inguruan ikus zitezkeen irregulartasunak salatzeari ekin zioten. Orduko hartan Londreseko Milurtekoaren Noriara igo ziren. Azaroaren 26an, Hagako Bakearen Jauregiaren teilaturaino eskalatu zuten. Urtarrilaren 25ean, Berlineko irrati-telebistaren dorrea eskalatu zuten. Otsailaren 24an, Vatikanoko kupulara igo ziren, Erromako San Petri basilikan...

1999/11/16. Getxo Artea taldeko Aratz Gallastegi errugbi-jokalariak **Espainiako selekzioan ez jokatzea erabaki zuen**.

1999/11/18. **Borondatezko lankideak**. Kolonbiako eraso paramilitar batean, Hirugarren Mundua eta Bakea GKEko **Iñigo Egiluz** eta Jorge Luis Mazo apaiza hil zituzten, paramilitarrak bi gizon horien txalupari oldartu eta gero.

177 Conversaciones con José Bové en "El mundo no es una mercancía". Op. cit., pp. 15 y 21 a 25.

1999/12/22. **Olentzero rotaflexarekin**. Espetxearen murruak birrintzeko tresna hobeak zituen Olentzerok urte hartan; horrela bada, Algeciraseko kartzelan, rotaflex batez baliaturik eskatu zuen Olentzerok euskal presoak Euskal Herrira hurbil zitzatela. Lau solidario atxilotu zituzten parodia hartan.

1999/12/27. **727 lagunek presoen aldeko gose-greba bati ekin zioten** Arrasaten, Iruñean, Gasteizen, Altsasun eta Bilbon. Astebete eman zuten greban, Gabon eta Urte Berri bete-betean. Azaroaz geroztik, hainbat presok txandaka hasi zuten gose-greba bat. Daniel Derguy presoak 2000ko otsailaren 27an utzi zion grebari, 63 egun baraurik eman eta haren osasun-egoera nabarmen larritu zenean. 2000ko maiatzaren 27an utzi zioten grebari oraindik barauialdia egiten segitzen zuten azken presoek. 2000ko ekainaren 30ean, ELAko milaren bat ordezkari sindikalek **baraualdi bat egin zuten presoen, elkarrizketaren eta tirabirarik gabeko egoera baten alde**.

2000/01/06. **Demoen lehenbiziko jendaurreko ekintza**. Sei militante Baionako kartzelako murrura igo ziren, eta han goian zeudela idatzi bat irakurri, presoentzako duintasuna eskatuz, haiek gose-greban baitzeuden. Behealdean, berriz, beste zenbait ekintzailek "Demokrazia Euskal Herriarentzat" margotu zuten hormetako batean; poliziak gerturatu zitzaizkielarik, margo gorria bota eta zeharo zikindu zituzten. Berehala atxilotu zituzten.

> Otsailean, Demoek beren asmoen berri ematen zuen idatzi bat eman zuten ezagutzera: "Demoak martxan!" izenekoa, alegia. Honelaxe diote: "Gure ekintzak herrikoiak izan daitezen saiatuko gara, erakargarriak (argi ibili artistok), jostariak (argi ibili umoristok), ulergarriak (argi ibili irakasleok), jende gehienak ongi hartuko dituenak (argi ibili engaiatuok), jendaurrekoak (argi ibili iraunkorrok), indarkeria-eza oinarri dutenak (argi ibili odol hotza duzuenok), eta azkenerainokoak (argi ibili egoskorrok). Legearen aurkako ekintzen ondorioak (fidantzak, espetxeratzeak...), berriz, abokatu-talde batek aztertuko ditu; horrela bada, ekintzaile bakoitzak bere ekintzen ondorioak onartu eta ulertu beharko ditu. 15 ekintzailek hasi dugu dinamika berri hau. Gure helburua ahalik pertsona gehienek parte har dezaten lortzea da (...) Parte har ezazu!".[178]

2000/02/15. **Baionan**, Demoetako hiru kide **autobus bateko goialdera igo eta presoen egoera larriaz arreta emateko kateatu egin ziren**. Bereziki, 51 egun gose-greban zeramatzan Daniel Derguy zuten gogoan: "Autobusean 15 minutu galtzea ez da ezer 51 eguneko gose-grebaren aldean. Dena dela, minutu horiek ezinbesteko izan daitezke, demokrazia gabezia

178 Igor Ahedo Gurrutxaga: *El movimiento Demo y la nueva cocina vasca (desobediente)*, Alberdania, Irun, 2004, 93. eta 94. or.

salatu eta lehenbailehen urrats batzuk eman daitezela eskatzeko".[179] Hurrengo egunean, **autobus-konpainiako zuzendariari gutun bat idatzi zioten, han gertatutakoaren berri emanez**; hona hemen, besteak beste, han ziotena:

> "Gure ekintza honek arreta ematea du helburu, betiere indarkeriarik gabe eta era ikusgarrian (...) Ahalik arazo gutxienak sortzen ahalegindu garela esan nahi genizuke, bidaiarien erosotasunari oztoporik jarri gabe. Hargatik, autobus gehien zituen linea hautatu genuen: kasu honetan, hurrengo autobusa 10 minutu geroago pasatzekoa zen (...) Ziur gaude gure asmo eta arrazoiak ulertuko dituzula, nahiz, beharbada, haiek ezin onartu". Halaxe, bada, gutuna sinatu zuten lau Demoek, eta beren abizen eta helbideak ere ipini zituzten.[180]

2000/02/17. Gipuzkoako bi udalek eta Nafarroako beste bik **soldadutzako zozketan parte hartzekoak ziren hainbat herritar zozketatik kanpo utzi zituzten, haiek hala eskatuta**. Ibarran, Billabona, Lizartzan, Leaburun, Zaldibian, Mutrikun, Zestoan, Oiartzunen, Lezon, Usurbilen, Anoetan, Hernanin, Berriozaren (120 herritarretik gora) eta Beran (2.000 herritarretik gora) burutu zuten ekintza hura; izan ere, "Espainiako konstituzioak ez du onartzen euskal herritarrok hitza eta erabakia izan dezagun".[181]

2000/03/08. Nazioarteko Emakumeen Martxa abiarazi zuten. New Yorken amaitu zen ibilaldi hura, eta kontinente guztietako emakumeak bildu ziren bertan. Nazio Batuen erakundera agiri bat eraman zuten, emakumeek mundu osoan pairatzen duen pobrezia eta indarkeriarekin akaba zezatela eskatzeko. 2005ean, ostera ere, emakumeen martxa Euskal Herrira iritsi zen; Brasildik zetozela, Karrantzara iritsi ziren maiatzaren 24an, eta handik Frantziako estatura joan ziren, harik eta urriaren 17an Burkina Fason bukatu zuten arte. Lekukoak **eskubideen gutun bat eta herri edo nazio bakoitzean erantsitako txatalez osatutako manta bat zeramatzan barnean**. 1995ean, Quebecen egindako pobreziaren aurkako martxa oinarri hartuta ekin zioten hainbat emakumek egitasmo berri hari. Orduko hartan, *Fédération des femmes du Québec* izeneko taldeak sustaturik, 850 emakumek 10 eguneko martxa bat egin zuten, "Ogia eta larrosak" goiburuarekin. Bukatzeko, 15.000 lagunek manifestazio jendetsua egin zuten.[182]

2000/03/14. **Paueko legebiltzarreko aulkiak Ipar Euskal Herrira**. Paueko Pirinio Atlantikoetako Kontseilu Nagusian euskal ordezkariei zegozkien 21 aulki hartu zituzten Demoetako hogeiren bat kidek. Euskal departa-

179 *Ibídem*,59. or.

180 *Ibídem*, 60. or.

181 *Gara* egunkaria, 2000ko otsailaren 18.

182 *www.marchamundialdelasmujeres.org/*

mentuaren aldeko ekintza ikusgarria izan zen hura, aulki haiek Euskal Herrira ekartzea helburu zuena –bi minutu baino ez zuten behar izan demoek beren ekintza egiteko–. Frantziako poliziak ahal zuena egin zuen beren muturren aurrean desagertutako aulkiak aurkitzeko; lau solidario eta zazpi kazetari atxilotu zituzten. Hara nola azaldu zuten Demoek ekintza burutsu hura: "aulkiok ez dute ezertxo ere egiten Paueko Kontseilu Nagusian; izan ere, euskal gizarteak ez du erakunde hura maite, han gutxiengo bat baizik ez baikara. Alkateen %64 euskal erakundeen alde azaldu da. Kontseilu Nagusiak, beraz, Euskal Herriko udalek agertu dioten asmo eta nahia bete behar dute."[183] Bi aste geroago, Pirinio Atlantikoen ordezkaritza berrian laga zituzten aulkiak Demoek.

2000/03/17. Hagan, Itoitzekin Solidarioak taldeko bi kide **biluzik sartu ziren** Urari buruzko Nazioarteko Foroan, urtegiaren inguruan gertatzen ari zena salatzeko.

2000/05/21. Beste lau udal ere UEMAko partzuergoan sartu ziren. Erakunde horretan udaletan euskara erabiltzea bultzatzen duten elkarteek parte hartzen dute; dena den, Espainiako Auzitegi Gorenak legez kanpo utzi zuen UEMA martxoaren 10ean; haren ustez, izan ere, euskal udalek ez daukate euskara sustatzeko eskumenik, hura Autonomia Erkidegoari baizik ez omen baitagokio.

2000/05/26. **Zortzi herritan egindako hamarren bat egitasmotan parte hartu zuten Demoetako 62 kidek era bateratuan, kartzeletako egoera larria salatzeko**: hainbat udaletxe, azoka eta autobusetako hesi-burdinei **lotu** zitzaizkien, bai eta **Miarritzeko aireportuan irtetekoa zen hegazkin bateko gurpilei ere**; horretaz gain, **bitan blokeatu** zuten Hendaia eta Paris lotzen zituen trenbidea (20 demok jardun zuten ekintza horretan), eta orobat Baionako Auzitegiaren aparkalekua (bi demok besoak kateatu zituzten gasolina-bidoi baten barruan). Presoen argazkiz betetako 500 kartel ere jarri zituzten hiru kilometro luze zituen bide batean, eta Donapaleun, berriz, hainbat eraikin publikotako hormak eskalatu zituzten, goialdean pankartak jarriz.

2000/05/27. Armadaren eguna ospatzen zela aprobetxatuz, Bartzelonan **"Anti-desfile"** bat egin zuten giro alai, askotariko eta antimilitaristan. 70.000 herritar bildu ziren manifestazio handi hartan –Espainiako armadari txalo egitera hurbildutako militar, familiarteko eta adiskideak, aldiz, 3.000 baizik ez ziren izan–.

183 *Gara* egunkaria, 2000ko martxoaren 15.

2000/06/11. **Euskal Selekzioaren Eguna**. Euskal Herriak bere kirol-selekzioak izateko eskubidea aldarrikatu zuten Bilbon milaka pertsonak. Arrazoi hori tarteko, klubei eskatu zieten eman ziezaietela beren kirolariei beharrezko irizten zioten euskal lizentzia.

2000/06/19. Lehenago aulkiekin egin zuten modu berean, orduko hartan Demoek **Lapurdiko Biltzarreko Erabaki Liburua** ekarri zuten **Euskal Herrira** Paueko Artxibo Nagusitik. XVIII. mendeko liburu horretan, Euskal Departamentuaren alde egindako lehenbiziko aldarrikapena ageri da; Joseph Garatek egin zuen, Gorte Konstituziogileari zuzendutako adierazpen batean. Ondoren egin zuten prentsa-aurrekoan, liburua jendaurrean erakutsi eta beren ekintzaren nondik norakoak azaldu zituzten:

> “Demoen ekintza ilegala? Ingelesek ere ez al zuten, bada, legez kanpokotzat jo Gandhiren jarduna, hura lege ingelesen aurkakoa zelakoan? Zer alde dago legez kanpokotzat hartzen dituzuen Demoen ekintzen eta 1965ean, Dallasen, herritarren eskubideak babesteagatik delitutzat hartu zuten Martin Luther Kingen jardunaren artean?”.[184]

Hainbat historialarik, ikerlarik, legelarik, irakaslek, abokatuk eta notariok ekintza haren aldeko idatzi bat sinatu zuten; Demoak aske utz zitzatela eskatu zuten agiri horretan.

2000/06/27. **Euskal Herriko Pilota Federazioak alde egin zuen Espainiako Federaziotik**. Halaxe erabaki zuen Euskal Herriko Pilota Federazioaren Batzar Nagusiak. Gehiengoz, erabaki ere; izan ere, batzarkideen %92k erabaki zuen Espainiako Federaziotik alde egitea. 2002ko abuztuaren 16an, Nazioarteko Pilota Federazioa sortzearen alde eta Iruñeko Munduko Txapelketan euskal selekzioa ez egotearen aurka agertu zen ESAIT. Nolanahi ere, Espainiaren nahiz Frantziaren presiopean, Nazioarteko Pilota Federazioak ordezkaritza propioa ukatu zion Euskal Herriari 2002ko abuztuaren 26an, eta Euskal Federazioak proposaturiko estatutu aldaketa baztertu zuen.

2000/07/16. Txirrindulariz jantzita, **solidarioek Tourreko etapa batean parte hartzea lortu zuten**. Mendiko etapa bateko azken metroetan, elastiko horiak jantzirik zeramatzaten bi solidario bizikleta gainera igo, eta errepidera jauzi egin zuten. Elastikoetan Euskal Herriko mapa bat ageri zen, eta bertan hainbat gezi, honako mezu honekin: *prisionnier(e)s basques*. Frantziako itzulia ikusten ari zirenen harridurarako, euskal txirrindulari batek helmuga igaro zuen, han zeudenak agurtuz eta den-denei musu emanez. Zuzen Ekintza

184 Igor Ahedo: *Op. cit*., 74. or. *in* Demo: “*Dans le sillage de Gandhi et de Martin Luther King*”, 2000b.

Taldeko kideak ziren haiek, eta geroago esan zutenez, “hemen askoz ere Tour gogorragoak egin behar izaten dira, gure presoak ikustera joateko”.[185]

2000/08/12. Frantsesez baizik idatzita ez zeuden **hainbat trafiko-seinale erretiratu zituzten** Demoek, lau leku desberdinetan 27 pertsonak parte hartu zuten ekintza batean. Gero, seinaleak –haietako zenbait bizpahiru metro luze zutenak– kamioietan eraman zituzten trafiko-seinaleak egiten zituen Urruñako enpresa batera, hango langileak kalean geratzekotan baitzeuden.

2000/09/09. Prentsa-aurreko batean, Demoek Paueko Artxibategi Nagusitik ebatsitako dokumentua erakutsi zuten, eta argi eta garbi adierazi borondate irmoa zutela “Pirinio Atlantikoetako Departamentua behar bestetan oztopatzeko”. Horri erantsi ziotenaren arabera, ebatsitako agiria orduan sortzeke zegoen Euskal Herriko Artxibategian utziko omen zuten. Era berean, **beren burua erruduntzat jo zuten 140 lagunez osatutako zerrenda agertu zuten.** Bere aldetik, poliziak hainbat etxebizitza miatu zituen, eta zenbait ekintzaile atxilotu, Biltzarreko idazpuruaren bila zebiltzala.

2000/10/05. Paueko Auzitegiak Biltzarreko idazpurua lapurtzeagatik inkulpatu zuen Txetx Etxeberri **Pauera joan eta prentsa-aurreko bat eman zuen, hara joateko epaileek jarri zioten debekuari jaramonik egin gabe**. Hala, militante historiko horrek bere egin zuen kartzelara eraman zezakeen ekintza desobeditzaile hura, beren burua erruduntzat jo zuten 140 pertsonen erabaki kolektiboarekin bat eginez.

2000/10/05. ABK, Bai Euskal Herriari eta Joxemi Zumalabe Fundazioko bederatzi kide atxilotu zituzten. “Ordena konstituzionala hankaz gora jartzeko desobedientziazko estrategia” bateratu batean, ETArekin kolaboratzea leporatu zieten. Hilabete geroago, hamargarren pertsona bat atxilotu zuten Bilbon, “Piztu” dokumentua idaztea leporatuta. Haietako bost lagunek ia zortzi hilabete eman zuten kartzelan. Epailearen autoan esaten denez, 50etik gora omen ziren ustez ETAk gidatutako desobedientzia zibileko estrategian nahasirik zeuden talde eta pertsonak.

2000/10/18. **Manifestazio jendetsua** Donostian, hilaren 5ean egindako atxiloketen aurka protestatzeko. Ibilbidean zehar, lan-jantzi zuriz jantzitako hainbat gaztek **Gipuzkoako Auzitegi Probintziala sinbolikoki itxi zuten**. Eusko Jaurlaritzako Giza Eskubideen zuzendari Juanjo Martínez Leundak ere parte hartu zuen manifestazio hartan, eta horrek sutan jarri zituen Espainiako hedabideak. Euskal Autonomia Erkidegoko Justizia Auzitegi Gorenak, hala-

185 *Gara* egunkaria, 2000ko uztailaren 17.

ber, begi txarrez begiratzen zien gisa hartako ekintzei, “erakundeen izen ona zikintzen baitute”.

2000ko urriaren 26 eta azaroaren 18. **Beren burua erruduntzat jo zuten**. Urriaren 5ean desobedientzia zibilaren aurkako operazioan atxilotutako pertsonei elkartasuna adierazteko, milatik gora lagunek beren burua erruduntzat jo zuten. Jendea samaldaka joan zen epaitegietara, eta han agiri bat izenpetu; agiri horretan ziotenez, akusazioa zeharo faltsua omen zen; beraiek ere atxilotuen modu berberean jokatu zutela adierazi zuten, eta haiek “kontzientziako preso” kontsidera zitzatela eskatu zuten. Horrela bada, desobedientzia zibilaren alde egin zuten den-denek. **1.700 pertsona izatera iritsi ziren beren burua erruduntzat jo zutenen kopurua**.

2000/12/06. **Abenduaren 6ko ospakizuna egutegitik kendu**, eta Espainiako Konstituzioaren egunean lan egitea erabaki zuten Hernani, Usurbil eta Errezilgo udaletako langileek, 2000ko urrian egi zuten bileran. Era berean, gauza bera egitea pentsatu zuten Pilarreko Andre Mariaren egunez –Hispanitatearen egunez, alegia– eta Santiago egunez –Espainiako zaindariaren egunez, alegia–.

2000/12/06. Espainiako Konstituzioaren egunean, Ikasle Abertzaleak (IA) taldeak **herri-eskolak antolatu zituen**. Haien ustez, “desobedientzia ekintza bat da, egun horretan jai egitea agintzen baitute Espainiako legeek”. Eskoletan gai asko jorratu zituzten, giza zientziei buruzkoak nagusiki.

2000/12/28. Orduko hartan den-denak bildu ziren: **Olentzero, Bizar Zuri, Errege Magoak eta Gabonetako beste hainbat pertsonaia. Elkarrengandik bereizten zituzten desberdintasunak alde batera utzi, eta “presoak Euskal Herrira ekartzen saiatzeko” batu ziren pertsonaia haiek guztiak**. Demoen ekimenez, La Santé kartzelako murruetara igo ziren denak. Dena den, guzti-guztiak atxilotu zituzten azkenean.

## XXI. mendea

2001/01/28. Telefonicaren filial ohi Sinteleko langile-talde batek kanpadendak jarri zituen **Madrilgo Paseo de la Castellana pasealekuaren erdi-erdian**; kanpadenda haiek erresistentzia-kanpamentu bat izan ziren **187 egunez**. Zor zitzaien soldata ordaintzea eskatzen zuten.

2001/02/23. Egun haietan 15.130 ikaslek deklarazio bat sinatu zuten. Deklarazio hartan **garai hartako hezkuntza-sistemaren kontzientzia-eragozleak** zirela adierazi zuten, Ikasle Abertzaleak taldearen “Udaberri

Intsumitua" kanpainaren barruan. Sinadura bat baino gehiago, ikasle-mundutik egindako "jarrera intsumisoaren konpromiso bat" izan zen.

2001eko otsaila. **Bake-konferentziaren proiektu baterako ekimena**. Elkarri izan zen bultzatzailea eta parte-hartze sozialaren esperientzia berri bat izan zen: izena eman zuen pertsona bakoitzak bere inguruko hamar pertsona lortzeko konpromisoa hartu zuen. Azkenean 50.000 sinadura baino gehiago bildu ziren, 50 milioi pezeta baino gehiago. Izan ere, pertsona horietako bakoitzak 1.000 pezeta jarri zituen. Gero bigarren fasea etorri zen; II. Bake Konferentzia. 2001eko urriaren 7tik 2002ko apirilaren 26ra bitartean egin zen, eta **lau proiektutan oinarrituta** zegoen: **hitz bat, liburu bat, txosten bat eta orri bat.**

> "Lehenengo proiektuaren helburua zen *berdintasun* hitza alde guztietara zabaltzea, bake-prozesu baten oinarrizko printzipio gisa. Bigarrenak eztabaida-programa zabal bat antolatu behar zuen, eta liburu batean jaso. Hirugarren proiektuaren helburua zen herritarren parte-hartzea bultzatzea eta parte-hartze hori txosten batean jaso eta argitaratzea. Orriaren helburua, hau da, laugarren proiektuaren helburua, moderatzaile-talde baten eta indar politikoen arteko komunikazio-zirkuitu bat sortzea zen; horren bidez bake-prozesu baten printzipioei eta prozedurei buruzko akordio plural batera iristea zen asmoa. Lehenengo hiruak bete ziren, baina alderdi politikoen arteko adostasunaren orriak ez zuen lortu alderdi politikoak akordio esplizitu batera iristerik; dena den, bi testu-zirriborro adostu zituzten, akordio posible baten antzeko zerbait".[186]

2001/03/28. Mexikoko hiriburura martxa luze bat egin ondoren, EZLNko emakume indigena batek, zenbait kargudun zapatistarekin batera, **hitza hartu zuen kongresuaren aurrean**: han, hitzaldi historiko batean, Eskubide eta Kultura Indigenen Legea defendatu zuen.

2001/04/06. EHNEko hainbat eta hainbat abeltzainek **lasto-fardoekin horma bat eraiki zuten Eusko Jaurlaritzaren Lakuako egoitzaren sarreran.** Ekintza horrekin adierazi nahi zutena zen "Euskal Autonomia Erkidegoko gobernuak euskal abeltzainen sektorearekiko azaltzen duen mespretxuzko jarrera eta jokabidea".

186 1995eko martxoaren 8tik 12ra I. Bake Konferentzia egin zen Carlton hotelean, Bilbon. Ez zen akordio zehatzik egon, baina bai hurbilketarako idatziak. EAJ, HB, EA, UA, NEB eta EB alderdiek hartu zuten parte. Bigarren konferentzia bat egin zen aurrez aipatutako datetan. Bi konferentzien artean, Elkarrik adostasun-egoerei buruzko bost proposamen egin zituen. Alderdi politikoekin egiaztatu eta eztabaidatu zituen zuhurki ia bi urtean zehar. Hortik sortu zen Izan proposamena. 2003ko urriaren 4tik 2005eko ekainaren 19ra beste konferentzia bat egin zen, hirugarrena. Konferentziaren helburua zen alderdi politikoen elkarrizketarako mahai bat sortzea eta hori bultzatuko zuen akordio plural bat lortzea. 122.513 sinaduraren babesa jaso zuen, baita nazioartearen babes handi samarra ere (http://www.elkarri.org/conferencia_de_paz/actualidad/object.php?o=1001).

2001/04/23 eta 2001/04/24. Poligono Gabeko Bardeak plataformak proposatu zuen **“etengabe” deitzea telefonoz “Bardeako Juntara”**, “telefonogunea paralizatu arte”, jasota gera zedin Bardeako tiro-eremuaren kontratua luzatzearen aurka zeudela.

2001/04/25. **Errentaren aitorpenean euskara erabiltzearen aldeko eragozpen fiskala**. “Euskarari zor zaiona. *Declárate al euskara.* Egin Hizkuntza politika zure errenta aitorpenarekin” zuen goiburua Oinarriak taldearen ekimen horrek. Hainbat erakundek eman zioten babesa, hala nola, Karrikiri, AEK, Ikastolen Elkartea, Sortzen-Ikasbatuaz, Euskara Kultur Elkargoa taldeek eta LAB, STEE-EILAS, ESK eta CGT sindikatuek. Euskalgintzaren izenean irekitako kontu batean 5.000 pezeta sartzeko eskatu zuten, eta kopuru hori errentaren aitorpenetik gutxitzeko. Sustatzaileek bulegoak jarri zituzten inprimakiak betetzen laguntzeko eta 560 pertsonak betetzea lortu zuten. Bildutako 15.000 euroak UEU Udako Euskal Unibertsitaterako eta Oinarriak taldearen “Euskara, eskubide osoz” kanpainarako erabili ziren. Ondorengo urteetan ere errepikatu zuten ekimena.

2001eko maiatza. **“Pezetarik ez gerrarako” eragozpen fiskala**ren kanpaina. Talde antimilitarista, ekologista, internazionalista, feminista eta abarrek bultzatu zuten. Gipuzkoan 1.700.000 pezeta bildu ziren eta Bizkaian, berriz, milioi batetik gora. Diru hori ez zen Defentsa Ministeriora joan; are gehiago, proiektu solidarioetarako erabili zuten. “Baliteke ekintza sinboliko bat besterik ez izatea, baina beharrezkoa da desobedientzia zibileko ekintza hau egitea presioa sortzeko. Alternatiba bat da”, zioen Argitanek.[187]

2001/05/07. **Oztopo-lasterketak**. Euskal Adarra taldeak bultzatuta, euskarazko irakaskuntzaren aldeko astea egin zen. Aste horretan, NUP unibertsitateko korridoreetan hainbat mahai agertu ziren bidea oztopatzen. Mahai haiek euskaldunek gainditu beharreko oztopoak adierazten zituzten. Bi egunez oztopo-lasterketak izan eta gero, gelak itxirik azaldu ziren. Ikasleen erantzuna, orduan, horma-irudiz eta globoz beteriko korridoreetan kalejira bat egitea izan zen; gero hamaiketako bat egin zuten haurrentzako musikaz alaiturik, egoera ere halakoxea baitzen.

2001/05/09. **Epaiketa utzi zuten harik eta epaileak euskaraz ulertuko zien arte.** EHEko kide batek aldibereko itzulpenari uko egin zion epaiketa batean. Izan ere, epaiketa hastean, iruditu zitzaion itzulpenak ez zuela Administrazioaren justizia bermatzen. Fiskalaren eta epailearen galderei erantzuteko prest agertu zen, “betiere euskaraz badira”; baina galderak euskaraz ezin zirela izan ikustean, bere abokatuari eskatu zion biek gela uzteko.

187 *Andra* egunkari feminista. Bilbo. 2002ko maiatza.

Halaxe egin zuten eta horrek zekarren zigorra onartu zuten. EHEk azaldu zuen “desobedientziaren bidetik joatea beharrezkoa” zela.

2001/05/10. **Enrike Lópezek sistema judizialaren intsumisotzat aitortu zuen bere burua eta ez zen epaiketara agertu** Bilboko zigor-arloko 4 zenbakiko salak EHUren Leioako campusetik botatako bost irakasleak zigortzea ebatzi zuenean. “Desordena publikoa eta agintaritzari desobeditzea” izan ziren egotzi zitzaizkien delituak. 26 asteburuz kartzelan atxiloturik egotea, eta 100.000 pezetako isuna eta epaiketaren kostuak ordaintzea izan zen epaile andreak ezarri zien zigorra.

2001/05/10. **Telebistarik gabeko Nazioarteko Eguna, eta** “kalitatezko telebista” baten alde. Plaza del Castillo elkarteak bultzaturiko hirugarren kanpaina izan zen. Erabiltzaileen eskubideak errespetaraztea eta iragarkien edo kontraprogramazioaren presio neurrigabea desagerraraztea zuen helburu. 24 orduz telebista piztu gabe egoteko gonbita zen.

2001/05/12. **Espainiako Ogasunaren ordezkaritza “bahitu” zuten sinbolikoki** Bilbon. Erdal Hezkuntza Sistemek Kaltetutakoen Erakundeak (EHSKE) taldeko kideek beren ateak zigiluz itxi zituzten eta “**bahitura-agindua**” zioen horma-irudi handi bat jarri zuten. Horma-irudi horretan hauxe irakur zitekeen: “derrigorrezko hezkuntza egitean behar bezala euskaldundu ahal izan ez diren 700.000 ikasleei 350.000 milioi pezeta zor zaizkie geroago beren kabuz egin behar izan dituzten alfabetatze- eta euskalduntze-ikasketengatik”. Ekintza horrekin Eusko Jaurlaritzara jo zuten diru hori Espainiako gobernutik berreskura zedin kupoaren bitartez, eta zuzenean deskontatu zezaten Espainiako Ogasunetik. Diru hori kobratzeak euskalduntzeko dirulaguntza unibertsal bat sortzeko balioko lukeela zioten.

2001/05/14. **Itutzat erabiltzen zuten hegazkin batera kateatu ziren eta bonbardaketa-maniobra batzuk etetea lortu zuten Bardean**. Bederatzi solidario tiro-eremuan sartu ziren eta pankarta bat zabaldu zuten. Pankarta horretan honako hau irakur zitekeen: “Bardeak herriarentzat. Soberanía es paz”.

> “Gaur tiro-eremuaren erdi-erdiraino iristea lortu dugu, beste bonbardaketa bat egin ez dezaten lortu dugu eta hegazkinak bira ematera eta Euskal Herriko zerua uztera behartu ditugu. Horregatik, uste dugu horrelako ekintzen bidea aukeraz beteta dagoela”.[188]

2001/05/14. **Ez badago trenik, on met un bus!** SNCF tren-konpainiako zuzendaritzak trenetako eta geltokietako zerbitzu eta horma-irudi informatiboetan euskara gehitzeari behin eta berriz uko egin eta gero, ordura arte ikasle

188 Solidarioen prentsaurrekoa, beren kideak Tuterako kuartelera zeramatzaten bitartean.

gehienak hartzen zituen trenari boicot egin zion Demo taldeak, eta bi autobus alokatu zituzten Baionatik Pauera eta Bordelera trenak egiten zuen ibilbide bera egiteko, 70 ikaslerekin.

2001/06/06. Emakumeen Osasunaren Nazioarteko Egunean, Gasteizko Emakumeak Borrokan taldeak **konpresak bidali zizkien** alderdi politikoei, Osakidetzari, Osasunbideri, Espainiako Osasun Ministerioari eta enpresa ekoizleei, goiburu honekin: *"Inor ez dadila gure kontura aberats! Inor ez dadila gure osasunarekin jolasean ari! Konpresak doan!"*. Taldearen kalkuluen arabera, emakume bakoitzak 70.000 pezeta ordaintzen ditu urtean konpresak erosteko "emakumea izateagatik soilik", eta, beraz, diru hori gastu publikotzat hartzeko eskatu zuten.

2001/06/12. **Desobedientzia soberanistaren aldeko manifestua** aurkeztu zuten Donostian talde antimilitarista, sindikal, politiko eta sozialetako kideek. Euskal Herriaren naziotasun- eta autodeterminazio-eskubideak lortu nahi zituztela zioten, eta, aurrez eramandako 40ez gain, **Europako Parlamentura beste 30 nortasun-agiri espainol eta frantses eramango zituztela** esan zuten. Adierazi zuten "d" bat erabiliko zutela logotzat.

2001/06/14. Hiru ikasle, bi Bizkaian eta bat Gipuzkoan, ikasmahaitik altxatu ziren selektibitate-azterketa hasi behar zuten unean eta **azterketak apurtu zituzten**. Hori egitean Ikasle Abertzaleak taldeak "*Selektibitateari intsumisioa!*" goiburuaz antolatutako protestaren arrazoiak azaldu zituzten. 2002ko ekainaren 12an beste bi ikasle altxatu ziren selektibitate-azterketaren erdian eta adierazi zuten probari uko egiten ziotela "inposizio bat" iruditzen zitzaielako.

2001/07/11. **Berdintasunezko alardea**. Irunen eta Hondarribian alarde misto bat egin ahal izatea eskatzen zuen emakume-talde batek Gasteizera eraman zuen eskaera, Eusko Legebiltzarraren aurrera, eta kritikatu zuen "bere garaian alarde mistoaren aldeko akordioak onartu zituela legebiltzarrak baina gero ez zuela ezer egin alarde misto horren alde". **Uniforme, txirula eta danborrekin desfilatzen zuten** bitartean "eskopetak etxean utzi zituzten", festetan berdintasun-egoeran parte hartzeko eskubidea aldarrikatu zuten.

2001/07/18. Zuzen Ekintza Taldea sortu zen Presoekin Elkartasun Taldetik, indarkeria-ezaren aldeko ikuspegi argi batekin. UEUn eman zuten ezagutzera. Zuria alde batera utzi eta buzo berde bat eta txapela beltza erabiltzen hasi ziren "uniforme" berritzat.

2001/07/27. **Harrera-Accueil.** Demoek harrerarako eta txartelak saltzeko leihatila bat jarri zuten Baionako tren-geltokian SNCF zioen kartel batekin.

Gezurrezko langileek, zegozkien uniformez jantziek, bidaiariei adeitasunez eman zieten arreta euskara nahiz frantsesa erabiliz. Egun batzuk geroago, tren-geltokiko seinale guztiak bi hizkuntzetan margotu zituzten, eta eraman egin zuten geltokiko kartel nagusia, frantses hutsean idatzirik zegoena, haren tokian beste bat jartzeko, frantsesez nahiz euskaraz. Urriaren 11n eta abenduaren 17an epaitu egin zituzten ekintza horiengatik eta isun ekonomiko gogorrak jarri zizkieten. Epaiketa-gelan zeuden pertsona guztiak kolpeka eta gas negar-eragileekin bidali zituzten "Euskal Herrian euskaraz" oihukatzen jardun ostean, epaileak ez baitzien akusatuei euskaraz hitz egiten uzten.

2001/08/26. Sakanako emakumezkoen sokatira-taldeak, Akitako (Japon) mundu-txapelketetan urrezko domina irabazi zuen. **Espainiako ereserkia jarri eta bandera gorri-horia altxatzen zuten bitartean, taldekideek ikurrina atera eta podiuma utzi zuten**. Hori zela eta, sokatira-talde euskaldun guztiak zigortu eta txapelketatik bota zituzten. Munduko Sokatira Federazioak abuztuaren 31n ezarri zuen beharrezkoa zela Espainiako ereserkia onartzea lehiatzen jarraitu ahal izateko. Sokatira-taldea ohorez hartu zuten Euskal Herrira iritsi zenean 29an, baina omenaldiekin batera ikuspuntu desberdinak zeudela ikusi ahal izan zen eta eztabaida bat piztu zen kirol-arloan jarraitu beharreko estrategiari buruz.

2001/08/26. Lekunberriko biztanleak Guardia Zibilaren kuartelaren parean bildu ziren **galtzontzilotan eta NAN agiria lepotik zintzilik** zutela, inguru hartan bizi zuten presioa salatzeko, batez ere errepideetako kontrolen bidez bizi zuten presioa, "biluzik uzten baikaituzte".

2001/09/01. Zuzen Ekintza Taldeak **autodeterminaziorako erreferendum** bat antzeztu zuen Euskal Herri burujabe eta desmilitarizatu hipotetiko batean. **NBEren indarretako militarrez jantzirik,** Tuterako autobidearen sarreran, A-8 eta A-15 elkartzen diren lekuan, babes-lerro bat osatu zuten "Euskal Herriak bere etorkizuna erabakitzeko boto-eskubidea askatasunez erabili dezan". Txalaparta eta trikitixa artean, gidariei ur-botila bat eta ekimena azaltzeko orri bat banatu zitzaien. Beste batzuk kabinen goialderaino igo ziren. Handik ordu erdira benetako guardia zibilak agertu ziren; kapitain bat aktibistengana hurbildu eta, hasiera batean, harriturik, agur militarra egin zien (hor geratu zen argazkia historiarako), baina berehala akatsa zuzendu eta joateko agindu zien. Nazio Batuetako "komandanteak", ordea, armak baztertzeko agindu zion guardia zibilari (benetakoa) hauxe esanez; "armarik gabeko eremuan zaudete; mesedez, utzi armak kanpoan" [189]. Horren ondoren NBEko dokumentu bat erakusten saiatu zen. "Komandanteak", antza denez, ondo-

189 *Egunkaria*, 2001/09/02, 6. or.

txo ezagutzen zituen gai haiek, “Mozambiken egona baitzen”. Kapitainak (benetakoak), ordea, ez zuen papera hartu, eta “haizea hartzera” bidali zuen. Kabinen gainean zeudenak atxilotzeko agindua eman eta gainerakoekin gauza bera egingo zuela mehatxu egin zuen, baita kazetari eta argazkilariekin ere, handik joaten ez baziren.

2001eko iraila. Donostiako Añorga auzoko bostehun bat biztanlek N-1 errepideko zirkulazioa moztu zuten errepideak Añorga zeharkatzen zuen ibilbidean, eta “**zebra-bideak” margotzen eta abiadura-kontrola adierazten zuten bide-seinaleak jartzen hasi ziren ibilbide osoan zehar**. Antzeko ekintzak egin zituzten irailean zehar errepidea auzoaren kanpoaldera desbidera zezaten eskatzeko.

2001/09/17.“**Dagokigulako**”. Euskal selekzioak Europako Surf Txapelketara joatea erabaki zuen, nahiz eta gonbidapenik ez izan. Hurrengo egunetan, Espainiako gobernuak presioa egin zion bere homologo frantsesari euskal selekzioa Europako Txapelketan egon ez zedin.

2001/09/29. **Herri-erreferenduma Iruñean**. Ia 20.000 iruindarrek hartu zuten parte Gazteluko plazako aparkalekuari buruzko auzo-erreferendumean, eta %94k ezezkoa eman zion.

2001/10/07. 5.360 pertsonak **Pagasarri mendiko 92.674 metro koadro erosi zituzten** Bilbon; bakoitzak mila pezeta jarri zituen **lursailak babestu ahal izateko.** Lursail horietan XVII. mendeko bi elur-zulo, 1914an mendizaleek eraikitako iturri bat (herri-harpidetzaz sortua hori ere) eta Taringo dutxak zeuden. Ekimena mendizale-talde batek bultzatu zuen, Pagasarri Gurea elkarteak, hain zuzen ere.

2001/10/13. **I. Desobedientzia Eguna, Zarautzen**. Burujabetzaren Aldeko Desobedientzialariak, ABK, Zarautzek Intsumisioa, Zuzen Ekintza Taldea eta Demo taldeek antolatu zuten. Goizean, zenbait talderen mahai eta erakusketez gain, zenbait eztabaida izan ziren desobedientzia zibilaren baliozkotasun, metodo eta helburuei buruz. Arratsaldean, berriz, herri-bazkari baten ostean, errebindikazio-festa bat ospatu zen.

2001/10/14. **Ez zuretzat, ez harentzat. Guztiona da**. Aurreko egunean Desobedientzia Eguna egiteko deia egin zuten talde berberek indarkeria-ezazko lehenengo ekintza gauzatu zuten; Bidasoa ibaian Irunen eta Hendaiaren artean dagoen Faisaien uhartea okupatzea sinbolikoki, hain zuzen ere. Agintari frantses eta espainolek han jarrita zuten monumentua zigilatu, eta lurralde hori “Euskal Herrian” dagoela deklaratu zuten. Desobeditzaileak txalupa txikitan joan ziren uhartera eta han egon ziren bidali zituzten arte.

2001/10/20. **Lorez mozorroturik, kasko militar erraldoi baten barruan, beste loreontzi batzuen artean**. Horrelaxe aurkeztu zen "intsumisoa kuarteletan", Javier Rodríguez Hidalgo, Defentsa Ministerioaren aurrean. KEM mugimenduak dei egin zuen ekintza horretara.

2001/11/10. **Lan-eragozpena**. Gasteizkoak Hego Euskal Herrian existitzen ziren 200 armamentu-enpresetan lan-eragozpenaren figura sartzea proposatu zuen. Ideia zen langileek helburu militarrerako elementuak ekoizteari ezetz esan ahal izatea, eta ekoizpen zibilean bakarrik jardutea.[190]

2002/02/01. **Agur nahitaezko soldadutzari**. Espainiako gobernuak nahitaezko soldadutzari eta ordezko gizarte-zerbitzuari intsumisioa egitea despenalizatu zuela adierazi zuen defentsa-eredua krisi betean zegoenean. Urte haietan guztietan, **10.000 gazte** inguruk aitortu zuten bere burua intsumisotzat Euskal Herrian.[191] **Intsumisioak eta desobedientzia zibilak nahitaezko soldadutzari irabazi zioten, beraz.**[192]

2002/02/02. EHEko hamar intsumisok kanpaina bat hasi zuten Gernikako Epaitegian egin behar zituzten izapide judizialetan zerbitzuak euskaraz jaso ahal izateko (Gernikako Epaitegiak 64.000 euskalduni eman behar zien arreta). **Erabaki zuten ez joatea epaitegira harik eta beren hizkuntza-eskubideak bermatu arte:**

> "Gernikako Epaitegiaren intsumisotzat aitortzen dut neure burua, eta nirekin dituzuen harreman guztiak hautsita geratzen dira; horregatik, eskatzen dizuet ez bidaltzeko ezer nire izenean erakunde horretatik".

Bazekiten jarrera hark agian kostu pertsonalak eragingo zizkiela, baina hauxe uste zuten:

> "Desobedientzia zibila baliozko metodoa izan daiteke bidegabekeria hau bideratzeko, eta, gainera, irtenbidea lortzeko elementu ona izan daiteke".

Apirilaren 20an Lea-Artibaiko eta Busturialdeko 800 lagunek Gernikako Epaitegiari intsumisioa egingo ziotela adierazi zuten, eta beren hizkuntza-eskubideak errespetatuak izan zitezen eskatu zuten. **Bi hilabete geroago 1.319 euskaldunek egiten zioten jada intsumisioa justiziari.** Ekainaren 7an, Gabi Basañezek, Koldo Rodríguezek eta Iñigo Arregik gose-greba hasi

190 *Gara* egunkariko elkarrizketa, 2001/11/10.

191 KEM eta Kakitzat taldeek 20 urteko intsumisioari buruz egindako balantzearen datuak, 2009ko martxoa.

192 Eragozle historikoen hausnarketak honako webgune hauetan: www.bideahelburu.org/testuak/01_04_primeros_objetores.htm eta www.bideahelburu.org/testuak/01_05_Balance%20Josean%20Kakitzat.htm

zuten justizia-administrazioa euskalduntzeko aukera emango zuen plan global bat eskatzeko.

2002/02/05. Hainbat koloretako metro erdiko **iratxo txiki batzuk** azaldu ziren azken egunetan Gasteizko zenbait tokitan. Inork ez zekien nondik zetozen, ezta zer nahi zuten ere. Ertzaintzak eta udaltzainek kendu zituzten iratxo haietako asko, baina gelditu zirenek prentsaurreko bat eman zuten. Prentsaurreko hartan adierazi zuten **basoko etxeak utzi zituztela beren magiaz Gaztetxeari babesa eman ahal izateko**; izan ere, Gaztetxea mehatxatuta zegoen, eta hura botatzea eragotzi nahi zuten.

2002/02/12. **"Bete zure formularioa, baina euskaraz".** Euskaraz Bizitzeko Hitzarmenak eta Euskalkidetza Kooperatiba Elkarteak gizarte-segurantzari ordaintzeko formularioa ez betetzeko deia egin zieten euskaldunei, formularioa gaztelania hutsean baitzegoen. Horrez gain, proposatu zuten Nahitaezko Diru-bilketako Ataleko dirua jende guztiari jakitera eman zioten zenbaki batean sartzea, gero frogagiria gizarte-segurantzara eramateko. Bi erakundeek eskaini zuten beren burua desobedientzia zibilaren kanpaina berri hartan aholkulari-lanak egiteko, zerbitzu guztietan (web orri, inprimaki, langile ez-euskaldun...) "gaztelania bakarrik egotearen aurkako protesta gisa" eta "horrek euskaldunei dakarkien marjinazioaren aurka".

2002/02/23. **Beren selekzioarekin bakarrik jokatuko dute**. Ipar Euskal Herriko sei pilotarik uko egin zioten Iruñeko Munduko Pilota Txapelketan Frantziako selekzioarekin jokatzeari. Martxoaren 17an Euskal Pilotaren Nazioarteko Federakuntzako presidenteak dimititu egin zuen batzorde exekutiboak ez zuelako entzun ere egin nahi euskal selekzioak Iruñeko Munduko Pilota Txapelketan parte har zezakeenik.

2002/04/01. **Arafat babesteko giza ezkutuak**. Atzerritar-talde batek lurralde okupatuetan bizi ziren palestinarrarekiko solidaritatea erakutsi zuen. Baina tentsioa oso handia zen eta, "*Mission civile de protection du Peuple Palestinien*" zioten elastikoak eta bereizgarriak eraman arren, indar israeldarrek eraso egin zieten. Handik bi egunera, Israelen tankeak Nablusen sartu ziren eta Belengo Natibitate eliza erasotzeko itxura egin zuten. Palestinarrei babesa ematen ari ziren pertsonen artean Fermín Muguruza eta Paul Nicholson zeuden. Paul Nicholson hilabete batez egon zen nazioarteko solidarioekin batera Arafat babesteko ezkutu-lanak egiten hura setiaturik zegoenean Mukatan, Ramalako kuartel nagusian. Israelek handik bota zuenean, Euskal Herrira itzultzean, Nicholsonek Sharonen "garbiketa etnikoa" salatu zuen.

2002/04/04. EHNEk esnearen prezioagatik eginiko protestak. Oiartzunen, Carrefour-en parean, **behi bat jetzi zuten, zuzenean animaliatik lortzen**

**den esnearen eta merkatuan lortutako esnearen arteko desberdintasunak erakusteko.** Protesta egin zuten pertsonek ziotenez, **“**merkatuan erositako esnea esne-hautsa esne-gazurarekin nahasita lortzen da”.

2002/04/11. SOS Tortura taldeko bi kidek **bi bainuontzi jarri zituzten Eusko Legebiltzarraren ateetan Gasteizen eta bainuontzietan sartu ziren**; elkarri loturik zeuden barrutik kate eta hodiz, eta odola irudikatzen zuen pintura gorriaz zikindutako buzoak zeramatzaten. Alboan, burdin hesietan, Unai Romanoren argazki handi bat zuten. Torturak salatu zituen gazte horren gurasoek, berriz, idatzi bat eraman zuten ganberara, kasuan inplika zitezen eskatzeko.

2002/04/15. Prentsaurrekoa **gauez, isilpean**, kriseilu batekin Baionaren kanpoaldean. MADEFek (Mariannen Askapenerako Demo Frentea) Marianneren hauteskunde-hautagaitza aurkeztu zuen, eta horrela azaldu zuen: “Egoerak desobedientzia zibila eskatzen du. Demoei laguntza eskatu nien udaletxe-kartzeletatik askatua izateko, eta, horrela, nik, Uztaritzeko Mariannek, presidentetzarako hauteskundeen bigarren itzulian hautagai aurkeztuko naizela jakinarazten dut”. “Marianne presidente. Hitza herriari” zuten goiburu. Buzo horiak eta txantxo zuriak jantzirik, hogeita hamarren bat militantek beren “armamentua” erakutsi zuten: **oilar bat,** Pauen UDFko buruzagi François Bayrouren bulegoa okupatzerakoan ardiekin batera joan zenaren modukoa; **aulki bat**, Biarnoko hiriburuko Parlamentutik aberriratuak izan ziren euskal aulkien modukoa; errepideko panelak bi hizkuntzetan jartzeko erabilitako **pintura;** demokrazia eskatzeko horma-irudiak kolaz itsasteko **erratzak**; euskal presoak Euskal Herrira ekartzeko ikurra zuten **banderatxoak**; **auto irauliak**, presoak ikustera joaterakoan istripua izandako senideenen modukoak; Parisen entzuten ez diren **bozgorailu** akastunak; **liburu bat**...

2002/04/19. **Heriotz Herri Operazioa**. Baionako merkatariek establezimenduak itxi zituzten bi orduz, krisian zeuden hainbat enpresetako langileen deialdiari erantzuteko, besteak beste, Ruwel enpresako langileen deialdiari. Alerta-egoeran zeudela gogorarazten zuen sirena entzun ostean, establezimenduak itxi zituzten danbor-, klaxon- eta txilibitu-hots artean eta oihu artean; hala, enpresak ixtean hiria hil zela antzeztu zuten. 1978ko urriaren 17an egin zuten dagoeneko antzeko ekintza bat Maulen, “Heriotz Herri”, Zuberoako zenbait enpresa ixteagatik protesta egiteko.

2002/04/26 - 2002/04/28. **Euskal pertsonaia mitikoak, sorginak, momotxorroak, inauterietako zenbait pertsonaia, akelarreetakoak, kaldereroen festetakoak, *drag queen*ak...** bildu ziren Iruñean jai-giroko akelarre batean.

Helburua zen Europar Batasuneko energia-ministroek Nafarroako hiriburuan egin behar zuten goi-bileraren aurka protesta egitea. Ekimenarekin, Hemen eta Munduan taldeak kalea berreskuratu nahi izan zuen, eta “energia txarren habiak sinbolizatzen dituzten tokiak” zeharkatu nahi izan zituzten gero kartzelara iritsi eta han Iñaki García Koch gogoratzeko, baina poliziak eragotzi egin zien inkisitorialki eta sorginei eraso zien.

2002/05/07. Ikasle Abertzaleak taldeak **ardi bat eraman zuen Ibaetako campusera,** EHUren sinboloaz egindako hesi batean **bazka zezan** Errektoreordetzako zelaian**.** Mezu hauxe zabaldu nahi zuten: “LOU Unibertsitateen Lege Organikoari, lege espainol eta erreakzionario horri, intsumisioa egin. Ez ditugu inposizioak onartuko. Artaldetik irtengo gara eta Unibertsitate euskalduna lortuko dugu”.

2002/05/28. Desobedientzialariak taldeak “**Dokumentu espainol eta frantsesei uko egiteko gida**” egin eta argitaratu zuen. Donostian aurkeztu zuten liburuxka, eta han azaltzen zuten bi estatuetako nortasun-agiriei uko egiten zien pertsona batek nola egin ziezaiekeen aurre izan zitzakeen zailtasunei, eta nola gainditu zitzakeen. Bestalde, Erandioko Udalbatzaren aurkako demanda bat aurkeztu zuten, Udalak nortasun-agiri nazionalaren zenbakia eskatzen zuelako udal-inprimakietan.

2002ko ekaina. **Eusko Jaurlaritzaren izena erabiliz, anagrama ofizial eta guzti, 100.000 diptiko baino gehiago utzi zituzten postontzietan. Diptiko horietan diru-laguntzak iragartzen zituzten salmenta askeko etxebizitzak erosteko BOEen prezioan**. Liburuxkan zioten programa hartara atxikitako banku-erakundeek baldintza mesedegarrietan emango zizkietela hipoteka-kredituak erosleei. Gogorarazten zuen, bestalde, EAEn 105.000 etxebizitza huts zeudela, eta **telefono-zenbaki bat ematen zuen informazio gehiagorako, 012 zenbakia, hain zuzen ere: jendearentzako arretaren benetako zenbakia.** Telefono-zenbaki hori Lakuako Etxebizitza Sailak jarria zen, eta sail horrek Herrizaingo Sailaren eskuetan jarri zuen kasuaren ikerketa. Giltzabide kanpaina zen; salatu nahi zuena zen “sustatzaile, eraikitzaile eta higiezinek etxebizitza bat izateko oinarrizko eskubidearekin egiten zuten espekulazioarekiko erakundeek erakusten duten pasibotasuna eta konplizitatea”

2002/06/22. Burujabetzaren Aldeko Desobedientzalariak taldeak **NANaren Portugaleteko bulegoa itxi zuen sinbolikoki** nortasun-agiri diskriminatzaileak iruditzen zitzaizkionak salatzeko, “milaka herritar egunero eramatera behartuta gaudelako, nahiz eta gureak ez izan”. Bulego hori eta antzeko beste

bulego batzuk “betiko” ixtea proposatu zuten. Antzeko ekintzak egin zituzten Iruñean eta Donostian ere.

2002/07/25. **Ezkabako gotorleku militarra hartzearen parodia**. “Nafarroako armada matxinatu”ko boluntarioek, lehengo erara jantzirik, Ezkaba mendiko gotorlekua “hartu” zuten sinbolikoki. Presondegi frankista izan zen gotorleku hori. Konkista “egunsentian, aurpegian ziertzo gogorra” zutela egin zuten, eta “Madrilgo enbaxadore nafarra kontsultetara deitu” zuten. “Operazio militar honekin, 1512. urtearen aurreko *statu quo*ra itzultzeko nahia adierazi nahi dugu, Nafarroa konkistatu zen urte odoltsu eta mingarri haren aurreko egoerara”. Alfontso XIII.aren gotorlekuan Arrano Beltza eta *presoak etxera!* zioten banderatxoak jarri ostean, hauxe adierazi zuten instalazio militarrari buruz: “Borboitarren menderaldi militarraren zorigaiztoko adibidea errekonkista nafarraren zerbitzura dago orain”.

2002ko Aste Nagusia. **Lehen lehorreratze pirata** arrakastatsua, Donostiako kaitik Kontxako hondartzaraino, nahiz eta era guztietako oztopoak izan. Ekintza horren sustatzaileen asmoa zen **urtero udalarekin zuten borroka haustea**; festetan txosnak jartzeko baimenagatik izaten zen borroka hori. Ekimen alternatibo bat sortzeko gai izan nahi zuten, urtetik urtera leku, parte-hartze eta erreferentzia handiagoa izango zuen ekimen bat. Mitologiara jo eta Ezkila kapitaina berreskuratu zuten, XVI. mendeko kortsario donostiarra, uhartean lo egiten duena eta urtero lehorreratzean parte hartuko duena. Logoa pospolina bat zen, buruan zapia eta begi batean txaplata zuena, eta goiburua, berriz, hauxe: “*Jai herrikoien alde. Abordaiara!*”. Piratek beraiek egiten zituzten baltsak eta ontziak; 700 lagun baino gehiago bildu zituen bazkari bat egin zuten eta abordatzea amaitzeko kalejira bat egiten zuten *belle époque* modernoa parodiatuz.[193]

2002/08/31. **Partida bat hirura**. Zuzen Ekintza Taldeko zenbait kide Iruñeko Labrit frontoian agertu ziren Munduko Pilota Txapelketako finalean eta jokalekuan sartu ziren, **pilotariz jantzita, hiru tanto jokatzeko asmoz**. Helburua zen aldarrikatzea euskal selekzioak parte hartu beharko lukeela mundu-txapelketa horretan. Izan ere, “euskal pilota”ren mundu-txapelketak ez zuen onartzen “euskal selekzioa” ordezkaritza espainol eta frantsesetatik kanpo. Guardiek ez zieten utzi eta, orduan, taldeko beste bi kide, pintura gorriz betetako poltsak gorputzean jarrita, jokalekuan sartzen saiatu ziren. Guardiek berriz ere bidea oztopatu zietenean, pintura-poltsak apurtu egin ziren eta txapelketa ordu laurdenez geldiarazi behar izan zuten.

193 Informazio gehiagorako, joan http://www.izanpirata.info/ webgunera.

2002/09/28. **Parte-hartzezko eta indarkeria-ezazko martxa jai-giroan, “kalea berreskuratu” goiburupean**. Lekua eta egoera: Gasteiz. Martxan musika, danborrak eta malabarismoak zeramatzaten. Bidean zenbait instantziaren parean gelditu ziren talde bakoitzak bere aldarrikapenak adieraz zitzan; esaterako, BBVAren parean gelditu ziren bankuaren politika kritikatzeko, edo McDonaldsen parean bi bertsolari abesten saiatu ziren, baina Ertzaintzak ez zien utzi eta esku hartuko zuela mehatxu egin zien bigarren aldiz. Lehenengo aldian mobilizazioaren buruan jarritako aldamio batean zeuden “errebindikazio politikoak” kentzeko agindu zien. “Amnistia” hitza eta “Euskal presoak Euskal Herrira” zioten bi banderaz ari ziren zehazki. Bandera horiek beste batzuen artean zeuden; gaztetxea, immigrazioa, etxebizitza edo sexu-berdintasuna aldarrikatzen zuten beste bandera batzuen artean, haiz zuzen ere. Zenbait talderen ordezkari eta partikularrez osatutako 25 pertsonek **baimenik ez eskatzea erabaki zuten**, eta hauxe izan zen eman zuten arrazoia: “guk uste dugu kalea ez dela pribatua. Bidezkotasuna eta arrazoiak nahi ditugu, eta baditugula uste dugu”. Poliziak esku hartu zuenean, eserialdi bat egin zuten eta gero Andre Maria Zuriaren plaza aldera joan ziren. Han intxaurrak, gazta eta sagardoa dastatu zituzten, organizazioak McDonaldsaren parean banatzea pentsatua zuena, hain zuzen ere.

2002/10/05. Demo mugimenduko hamabost kide **Baionako SCNFko geltoki-buruaren bulegoetan sartu ziren eta frantsesez eta euskaraz transmititu zituzten mezuak megafonoz**.

2002/10/06 - 2002/10/19. “**Matxinatuen Korrikaldia**”. Euskal gazte mugimenduaren ekimena “intsumisioaren eta desobedientziaren bidez estatu espainolari eta frantsesari aurre egiteko”. Lau zutabe irten ziren Elorrio, Tutera, Atharratze eta Laudiotik, bakoitza goiburu batekin: “Independentzia”, “Guk, Euskal Herria”, “Inposaketarik ez” eta “Intsumisioa”. Azken hiru egunetan zutabe guztiak batu ziren, 17an “intsumisio nazionalaren eguna” deitu zuten eta 19an Baionan amaitu zen. Ekimena azaldu zutenak honako hauek izan ziren: Zigor Ruiz, Iruñeko gose-grebako parte-hartzailea eta Garzón epaileak bilatzeko eta atxilotzeko agindu zuena; Ellande Alfaro, **pilotako selekzio frantseseko kide izateari uko egin ziona**; Koldo Gerrikagoitia, Gernikako Epaitegiaren intsumiso euskalduna; Alex Marañon, ikasle-mugimenduko kidea, eta Oier Gómez, **asteburuko baimenaz gazte-kartzelatik irten eta itzultzeari uko egin ziona, hau da, adingabekoen espetxe-sistemari aurre egin ziona**.

2002/10/07. **Kontuz, 100 metrotara kontrola**! Errepidean egon zitezkeen kontrol polizialez ohartarazteko lehenengo kartela jarri zuten Oiartzunen. Udal-akordio bat gauzatu zuten horrela. Ekimena EUDIMAtik sortu zen.

2002/10/12 eta 2002/10/13. II. Desobedientzia Eguna Ezpeletan. Demo, Zuzen, Desobedientzialariak eta ABK taldeek izenpekoa idatzi zuten "posible da autodeterminazioa praktikan jartzea desobedientzia zibilaren bidez" zioen dokumentu batean. Desobedientzia zibilari buruzko jardunaldiak aprobetxatuz, 50 bertaratu SNCFko geltokira joan ziren eta **frantses hutsean zegoen idazkuna kendu eta, horren ordez, bi hizkuntzetan zegoen panel bat jarri zuten**. Lau pertsona epaituak izan ziren horrengatik.

2002/10/23. **Beren unitatea zerbitzatzeari uko egin zioten Palestinako lurralde okupatuetan**. Erreserban zeuden armada israeldarreko zortzi ofizialek kontzientzia-arrazoiengatik Palestinako lurralde okupatuetan ez zerbitzatzeko eskubidea aitor zitzaien eskatu zuten. Nahiz eta Auzitegi Gorenak ez zituen onartu errekurtsoak, udazken hartan erreserban zeuden 512 ofizial israeldarrek dokumentu publiko bat sinatu zuten. Dokumentu hartan Zisjordania eta Gazako lurraldeetan zerbitzatzeko prest ez zeudela adierazi zuten, uste zutelako Israelek "ilegalki" okupatzen zuela lurralde hura. Horren ondorioz, ofizialen artean intsumisoen elkarte bat sortu zuten: *Ometz Lesarev* (uko egiteko adorea). Sinatzaileetako batek, David Sonschein tenienteak, behin eta berriz egin zion uko zerbitzatzeari eta berriro sartu zuten espetxe militarrean hiru astez. Berriz uko egiten bazuen, espetxeratze-agindua berrituko zioten defendatzeko aukerarik izango ez zuen bista batean.[194] Beste auzitegi militar batek seigarren aldiz espetxeratu zuen Jonathan Ben Artzi, 20 urtekoa, armadan sartu nahi izan ez zuelako eta leku zibil alternatibo bat eskatu zuelako. 2000. urtetik 170 gaztek egin diote uko armadan sartzeari; horietako asko *refuzniks* taldeko kide dira.

2002/10/24. **Arrastaka, aulki eta guzti**. Sondikan Osakidetzaren oposizioetarako azterketa egin zuten hiru pertsona mahaietara kateatu ziren eta euskararen aldeko oihuak egin zituzten. Haien elastikoetan hauxe irakur zitekeen: *"Aski da, euskaraz!"*. Segurtasuneko langileek arrastaka atera zituzten, aulki eta guzti. Azaroaren 1ean, EHEko beste hamabi kidek, hainbat minutuko tarteekin, azterketak eten zituzten berriz ere Bilboko Erakustazokan. Helburua zen euskara jakitea beharrezko baldintza izatea eskaintzen ziren 2.000 lanpostuetara aurkezteko (87.000 lagun aurkeztu ziren lanpostu haietarako). Azterketako mahaietara kateaturik, klaxona jo zuten *"Euskal Herrian*

194 *El País* egunkaria, 2002/12/31.

*euskaraz"* oihukatzen zuten bitartean; azkenean, segurtasun-guardiek airean atera zituzten.

2002/11/28-29 eta 2002/11/03 - 2002/11/16. **Indarkeria-eza aktiboari buruzko lehenengo jardunaldiak** Donostian eta Gasteizen, Bidea Helburu taldeak antolatuak. Urtero liburu bat argitaratzen da jardunaldi horiei buruz[195].

2002/12/06. Konstituzio espainolaren egunean, Ataungo Artadi Kultur Elkarteak **Konstituzio espainolaren aurkako** "**Desobedientzia Eguna"** egitera deitu zuen**.** San Gregorio plazan kontzentrazio bat egin ondoren, **"auzolan"en lan bat egin zuten jai-egunean**, eta, amaitzeko, herri-bazkari bat eta EHNE nekazaritza-sindikatuko kide baten hitzaldia izan ziren.

2002/12/17. **Ez dira txikikeriatan ibiltzen: gasak, borrak eta isunak**. Gorka Torrek eta Menane Oxandabaratzek, Demoko kideek, Baionan haien aurka egin zen epaiketan euskaraz deklaratu ahal izateko aukera aldarrikatu zuten. Arrazoi beragatik epaituak izan ziren Zuzeneko bi kidek euskaraz deklaratu zuten Hegoaldean. Baionan, ordea, epaileak ezetz esan zuen eta jendea salatik bidalarazi zuen protesten ostean. Jendea ez zegoen ados eta eraikinaren barruan eseri ziren modu baketsuan. Istiluen aurkako polizia frantsesak indarkeria erabiliz bidali zuen eserita zegoen jendea, borra eta gasekin. Horren ondorioz, hamar pertsonak ospitalera joan behar izan zuten eta beste bik komisariara (geroago 120 orduz "auzolana" egitera zigortu zituzten). Auzitegiak 1.500 euroko isuna jarri zion Gorka Torreri, eta 750 eurokoa beste hiru akusatuei. Egotzi zitzaien delitua izan zen SNCFko panel bat (frantses hutsean zegoena) "lapurtzea eta ondasunak degradatzea", bi hizkuntzetan (frantsesez eta euskaraz) zegoen beste panel batez ordezkatu zutelako. 720 euro ordaintzera ere behartu zituzten tren-konpainiari sortutako "kalte-galerengatik".

2002/12/21. **La Santé espetxeko patiora salto egitea lortu zuten Olentzeroz eta Bizarzuriz jantzita,** hormak eskalatu ondoren: Zuzen eta Demoko hainbat kidek batera antolatutako ekintza izan zen. *"Les prisionniers corses en Corse. Les prisionniers basques au Pays Basque? Bien sur non"* zioen pankarta handi bat jarri zuten, eta pankarta horren ondoan beste batzuk, *"Euskal presoak Euskal Herrira? Bai, noski"* zioen bat, esaterako. Behean beste lagun batzuk "Hator, hator etxera" abestiarekin dantzan ari ziren.

195 Jardunaldi horien eta ondorengo beste jardunaldi batzuen testuak http://www.bideahelburu.org/spip/spip.php?article10 webgunean. Hauek izan ziren hurrengo jardunaldietako parte-hartzaileetako batzuk: Jean Mari Muller, Paul Nicholson, Javier Sadaba, Juan María Setien, Arcadi Oliveres, Gorka Torre, Jon Sarasua, Jonan Fernández, Elena Grau, Jo Berri, Pat Magee...

Patiora jaitsi zirenek zenbait presorekin hitz egitea lortu zuten. Azkenean, parte-hartzaile guztiak atxilotu zituzten; 35 pertsona, hain zuzen ere.

2003/01/18. **Nafarroako hogeita lau alkatek euskararen eta ikurrinaren aurkako legeen intsumiso aitortu zuten bere burua**. Konpromiso bat sinatu zuten Euskal Herriaren nortasun-ezaugarri orokorrak defendatzeko, bereziki euskara eta ikurrina defendatzeko. Adierazi zuten beren asmoa zela udaletxeetako mastetan Euskal Herriko bandera nazionala eta katedun bandera gorria batera jartzea, eta ez zutela obedituko euskararen erabilera mugatzen zuen foru-dekretua. Horrez gain, esan zuten "astakeria" bat zela ikurrinaren erabilera zigortu nahi izatea "diputaziotik hasita, eraikin ofizial guztiak sinbolo frankistaz beteta" zeuden une historiko batean.[196]

2003/01/25. Burujabetzaren Aldeko Desobedientzialariak taldeko kideek "estatu espainolak eta frantsesak **inposatutako" nortasun-agiriez bestelako agiriak erabili zituzten** saltoki-gune batean kreditu-txartelez egindako **erosketak ordaintzeko**.

2003/02/01. Gandhiren heriotzaren 56. urteurrenean, Burujabetzaren Aldeko Desobedientzialariak taldeak Donostian ekitaldi bat egin zuen goiburu honekin: "*Pertsona eta herri guztien askatasunaren alde, desobedientzia zibila*".[197] **Lider indiarraz mozorrotutako pertsona batek bertaratuei nortasun-agiri nazionalak eskatu zizkien NBEra bidaltzeko**; ekintza horren bidez, pertsonek eta herriek "beren etorkizunak nolakoa izan behar duen erabakitzeko" duten eskubidea aldarrikatu nahi zuten. Bertaratuetako askok beren nortasun-agiria "Gandhi"k zeraman poltsa batean sartu zuten.

2003ko otsaila. **Protesta ahots askotara**. 20an Euskaldunon Egunkaria itxi zutela-eta, pertsona-talde bat Donostiako Alde Zaharreko Bilintx liburu-dendaren parean bildu zen abestuz protestatzeko. Esperientzia hartatik Kantujira sortu zen; hilabete bakoitzeko hirugarren larunbatean leku hartan bertan biltzen ziren euskal kultura eta herri-kantak zabaltzeko. Bosgarren urteurrenean, mila pertsonak abestu zuten Konstituzio plazan eta sumarioan prozesatuta eta epaiketaren zain zeuden pertsonei elkartasuna adierazi zieten.

2003/03/14. Greenpeace taldeko bi kide atxilotu zituzten, **zodiac batera igota** ("*No war*" eta "Aznar, di no a la guerra" pankartekin) **zamaontzi estatubatuar baten mugimenduak oztopatu zituztelako.** Zamaontzia Irakera zihoan gerra-materialez beteta. Hurrengo egunean Guardia Zibila

196 Hauek dira 24 udalak: Altsasu, Anue, Araitz, Arantza, Arbizu, Bakaiku, Bargota, Basaburua, Bera, Ergoiena, Etxalar, Etxarri-Aranatz, Garinoain, Goizueta, Irurtzun, Iturmendi, Larraun, Leitza, Olazti, Puiu, Urdazubi, Urdiain, Ziordia eta Zubieta.

197 Euskaraz jatorrizkoan.

Greenpeaceren Rainbow Warrior ontzira sartu zen indarkeria erabiliz, aingura moztu zuen eta ontzian zihoazen hiru pertsona atxilotu zituen aginte-zubiko kristalak apurtu eta gero.

2003/03/16. Kooperante batzuek beren gorputzak jarri zituzten hondeatzeko makina eta etxe palestinarren artean. Ahalegin asko egin zituzten boluntario internazionalistek Israelek palestinarren etxe, iturri, zuhaitz eta baratzeak suntsitu ez zitzan. **Rachel Corrie,** 23 urteko bakezale estatubatuar bat, armada israeldarraren hondeagailu batek zanpatuta hil zen Gazako errefuxiatu-esparru batean, soldaduei etxe bat suntsitzea eragotzi nahi zienean Salem auzoan, Rafahn, Gazaren hegoaldean. Corrie megafono batekin eta pankarta batekin zegoen, eta ordu asko zeramatzan hondeagailua gidatzen ari zen soldadua eraikina bota ez zezan konbentzitu nahian. Une jakin batean, soldaduak makina martxan jarri, gaztearen gainetik igaro eta hil egin zuen.

2003/03/19. Komite Internazionalistak taldeko hiru brigadista euskaldun **Bagdaden geratu ziren herritar zibilekin batera**, Iraken aurkako gerra hasia zen arren. Haien zuzeneko kronikek ematen zuten ikuspuntua ez zetorren bat militarrek kontrolatutako berri-agentziek ematen zutenarekin.

2003/04/05. **Ituan**. Zazpi pertsona Bardeako tiro-eremuan sartu ziren protesta egiteko Irakeko gerraren aurka eta horrelako tiro-eremuak hilketak entseatzeko erabiltzearen aurka. Guardia Zibilak atxilotu egin zituen.

2003/04/11. **Giza ezkutuak bala israeldarrei aurre egiteko**. Nazioarteko Elkartasun Mugimenduko gazte britainiar bat (24 edo 21 urtekoa, iturrien arabera), **Tomas Hurndall,** gerra-gurdi israeldar batetik jaurtitako bala batek buruan jota hil zen Rafahko errefuxiatu-esparruan, Palestinan. Antza denez, gaztea “giza ezkutu” gisa jarri zen soldadu israeldarren eta haur palestinar batzuen artean: haur palestinarrak kanpadenda bat jartzen ari ziren, Tsahalen gerra-gurdiak eta hondeatzeko makinak igarotzen ziren eremu batean protesta egiteko. Ospitalera eraman zutenean medikuek gaztearen garun-heriotza ziurtatu zuten. Aurreko astean, nazioarteko mugimendu bereko beste estatubatuar bat, **Brian Avery,** eta beste kooperante daniar bat larriki zauritu zituzten Jeninen.[198]

2003/05/25. 152.893 pertsonak[199] **Autodeterminazioaren Bilguneak (AuB) taldearen** 152.893 boto-txartel ilegalizatu eta jazarri sartu zituzten hautestontzietan Foru-hauteskundeetan eta Batzar Nagusietarako

198 2003ko apirilaren 12ko “ABC.es” eta 2003ko apirilaren 11ko “La Jornada Virtu@l”.

199 2008ko *Gara* egunkariaren urtekariko 121. orriko “Evaluación del voto” boto-ebaluaketan jasotako datuak. EHUko irakasle Petxo Idoyagak, garai hartako Jarraipen Batzordeko kideak, behin baliogabeko botoen ohiko ehunekoa kenduta 153.497 hautesle egon zirela azaldu zuen “Hika”n 2003ko uztailean.

Hauteskundeetan. **Beraiek egin zituzten boto-txartelak beren baliabideekin;** izan ere, Estatuko Fiskaltzak eta Auzitegi Gorenak ez zuten onartu AuBren hautagai-zerrenda, eta Espainiako Auzitegi Konstituzionalak berretsi egin zuen erabaki hori. 2009ko martxoaren 1ean, Eusko Legebiltzarra aukeratzeko hauteskundeetan, D3Mren hautagaiek baliogabeko botoa eskatu zuten berriz ere. Ezker abertzaleak honela definitu zuen gero: **"Europan parekorik izan ez duen desobedientzia zibileko ekintza masiboa, bizi den apartheid politiko eta instituzionalaren aurrean"**.[200]

2003/06/16 - 2003/06/18. Hiru egunez, biztanle, lagun eta Itoitzekiko Elkartasuna taldeko kideak **Itoitzetik joanarazi ez zitzaten eta herria bota ez zezaten lortzen saiatu ziren era baketsuan. Horretarako, kateatu, teilatuetara igo edota bunkerretan ezkutatu ziren**, nahiz eta horrek arrisku handian jarri zituen, hondeatzeko makinek ez baitzuten ezer errespetatzen. Eraistea oso bortitza eta iraingarria izan zen, baina erresistentziak hiru egunez eutsi zion tinko eta irudimentsu. Azkenik, suhiltzaileek solidarioak bunkerretik atera zituzten. Gertaera haien ondorioz, 11 pertsona epaitu zituzten hasieran, eta beste 19 pertsona 2007ko uztailaren 24an; egotzi zitzaien delitua desobedientzia larria izan zen. Horrez gain, Nafarroako Gobernuak salatu egin zituen eta 36.022,41 euroko erantzukizun zibila eskatu zien haiek joanarazi zituen polizia foralaren janaria, garagardoak, ogitartekoak, aparteko orduak eta ez-apartekoak ordaintzeko.[201]

2003/06/20. ***Berria*** **egunkariaren lehen zenbakia argitaratu zen.** Lau hilabete lehenago, otsailaren 20an, Guardia Zibilak euskaraz idazten zen egunkari bakarra itxi zuen: Euskaldunon Egunkaria. Lau hilabete haiek nahikoa izan ziren, *Egunero*ren agerpenarekin lehenbizi, eta herritarren babes handiaz, egunkari berri bat martxan jarri ahal izateko.

2003/06/22. Jendarmeak José Bovéren etxean sartu ziren atea botaz eta atxilotu egin zuten. Handik Montpelliergo espetxera eraman zuten helikopteroz, kartzelan egoteko geratzen zitzaizkion 10 hilabeteak beteko zituela ziur-

200 Itziar Lopategi, Bilboko Esperantza frontoian. 2009ko martxoaren 2ko *Gara* egunkarian, 5. or.

201 «Mabel Cañada: 'Denbora eta ahalegin handia behar izan genituen Jakue eta Bernatena etxeak benetako trintxera bihurtzeko' (...) Gazteetako batek azaldu zuen nola enkofratu ziren besoekin Jakueko hormara. Giltzarrapoak itxi zituzten unetik, ez zuten askatzeko aukerarik. Hartara, ezingo zitzaien 'agintaritzari jarkitzea' edo 'men ez egitea' leporatu. 'Eta berehala ikusi genuen oso urduri jarri zirela ez zutelako halakorik espero' (...) Bunkerraren barruan gorde zen nesketako batek hauxe azpimarratu zuen: 'astelehenean dagoeneko hondatu zuten egituraren zati bat. Barruan geunden eta harriak erortzen zitzaizkigun, inolako axolarik gabe aritu ziren' (...) Bernatenan ezkutaturik egon zen solidarioetako batek azaldu zuen asteartean gaueko azken orduan irtetea erabaki zutela 'etxea bota behar zutela entzun genielako, eta konturatu ginen uste zutela ez zegoela inor gehiago barruan. Oso arriskutsua zen. Hauxe entzuten genien: *Non zaudete, kabroiak?* Eta atera egin ginen salatzeko beste pertsona bat zegoela ezkutaturik eta pertsona hori hiltzeko benetako arriskua zegoela'» (Insumissia. www.antimilitaristas.org/spip.php?article3384 eta 2003ko ekainaren 20ko *Gara* egunkaria).

tatzeko. **Bovék uko egin zion kartzelan bere kabuz sartzeari.** 1999ko abuztuan McDonalds baten eraispen sinbolikoan parte hartu zuen.[202] Betetzeko geratzen zitzaizkion 10 hilabeteak arroz-landare transgeniko bat txikitzeagatik (1999) eta transgenikoen haziak txikitzeagatik (1998) ziren.

2003/07/05. Gazte Abertzaleak taldeko hamar bat gaztek Posta eta Telegrafo bulegoetan **sinbolo frankistak zeudela salatu zuten Bilbon**. Zazpi metroko eskailera batekin, eraikinaren fatxadan bi pankarta jarri zituzten “Desobediencia al franquismo” goiburuaz. Ekintza horrek DesobedientEA izeneko talde berri bat aurkezteko balio izan zuen. Taldearen helburua zen desobedientzia zibila bultzatzea “gure herriaren askatasuna eta ukatzen dizkiguten eskubideak lortzeko”, azaldu zuen Iñaki Sánchezek.

2003/09/08. **Berdintasunaren aldeko ibilbidea egin zuten festetan ere**. Jaizkibel konpainia mistoak, Ertzaintzak inguraturik, Hondarribiko Alardearen ibilbide osoa egin zuen lehen aldiz. Beste urte batzuetan erasoek edo kaleak itxi izanak eragotzi egin zien ibilbidea amaitzea.

2003/09/11. **Giza blokeoak MMAren bilera oztopatzeko.** Poliziak gogor erreprimitu zuen Cancúneko protesta eta EHNEko sindikalistari, Paul Nicholsoni, bederatzi jostura-puntu eman behar izan zizkioten. Beste hainbat zauritu ere izan ziren. Lee Kyang Haek, La Vía Campesina nekazaritza-mugimenduko Koreako kideak, bere burua hil zuen protestan bihotzean aizto bat sartuz.

2003/09/27 - 2003/09/29. **Artozkiko erresistentzia Artezki bihurtu zen**. Itoizko urtegiaren mehatxupean zegoen herria “arteari, sorkuntzari eta kritikari irekita dagoen gune bizia” bilakatu zen. Hainbat artistaren lanak bildu ziren, hala nola, Zumeta, Dora Salazar, Beatriz de la Vega, Javier Campo Amoros, Koldo Arnaz, Ander Hormazuri, Iñigo Altolagirre, Keixeta, Barbara Stammel, Unai Saez, Luis Morea eta Koldo Agarrabere margolarienak; Anda Goikoetxea, Josetxo Crespo, Juan Gorriti, Iñaki Olazabal, Izotz Mendiburu eta Igor Obeso eskultoreenak; eta Yolanda Mazkiaran eta Beatriz de la Vega bideo-sortzaileenak. Patxi Eugi eta Eulate kirolariek pilota bat eta elastiko bat eman zuten hurrenez hurren; Pou anaiek, berriz, eskalatzeko zapatilak. Txalaparta argitaletxeak ehun bat liburu eman zituen, eta fatxadetako batean zintzilik jarri zituzten. Gorka Torre demoak bere liburua eman zuen eskaintzarekin, eta gauza bera egin zuen Enrike Zelaia akordeoilariak CD batekin. Dena jendaurrean jarri zuten ikusgai eta dena zaborren azpian geratu zen hondeatzeko makinak sartu zirenean. Asteburuan,

202 Gilles Luneau kazetariarekin batera duen liburuan, hauxe aipatzen du José Bovék desobedientzia zibikorako oinarrizkotzat jotzen dituen irizpideen artean; «ondasunei eraso egiten bazaie, dimentsio sinboliko bat bakarrik izan daiteke, umorez, aurpegia estali gabe. Erakutsi behar da jabetza pribatuak ezin diola aurre egin interes orokorrari» (“Por la desobediencia cívica”, *El Viejo Topo*, 151. or.).

zenbait artista grafikok, besteak beste, Asisko Urmeneta, Marko Aspach, Zaldi Eroa eta Wanker-ek, mehatxatutako etxeetako hormetan muralak egin zituzten. Zenbait musika-taldek, berriz, kontzertu akustiko bat eman zuten: Lakabeko Hurto; Deshechos (Hechos contra el decoro ohiak), eta Fermín Muguruza, Sorkun eta Kontrabanda izan ziren, besteak beste. Oihulari Clown antzerki-taldearen laguntza izan zuten. Gero txikizioa iritsi zen.

2003/10/04. **Egin korrika, dantza eta eman botoa, hauek uzten dizute eta**. Autodeterminazioari buruzko erreferendum baten aldeko ekimena izan zen **"Zuzen Sound System"** deiturikoa. Donostian egin zen (Amaratik Grosera bitartean), eta martxa arin bat izan zen, oinez, dantzan eta korrika kamioi baten atzetik; kamioiak agertoki bat zuen eta musikariak eta dantzariak txandaka aritu ziren ikuskizunak ematen bertan. Ekitaldia Kursaalaren ondoan amaitu zen erreferendum sinboliko batekin. 1.237 pertsonak eman zuten botoa, eta sentsibilitate frantsesa, espainola edo euskalduna aukeratu ahal izan zituzten honako galdera honi erantzuteko: "zer eratako egituraketa aukeratzen duzu lurralde honetarako?".[203]

2003/10/09. Greenpeaceko aktibistak **globo aerostatiko batera igo** eta Garoñako zentral nuklearraren gainean jarri ziren, zentrala itxi zezaten eskatzeko.

2003/10/11. III. Desobedientzia Eguna, Amurrion.

2003/10/25. **Ez baduzue zuek egiten, utzi guri egiten**. 500 pertsona baino gehiago atxilotu zituzten, haien artean Flandesko hainbat pertsona ospetsu, Monsen (Belgika) antolatutako protesta batean. NATOren indarren Europako Kuartel Nagusian (SHAPE) zegoen armamentu nuklearra "ikuskatu" nahi zuten taldeek antolatu zuten protesta.

2003/11/08. **Mus-txapelketa Baionako trenbideetan**. Demoek Baiona eta Hendaia arteko trenbideetan edo trenen gainean karta-partidak jokatzeko deia egin zuten. Helburua zen Société Nationale des Chemins de Fer (SNCF) tren-konpainiak euskara erabiltzea jendearentzako jarritako seinaleetan. Horregatik, trenak geldirik egon ziren hainbat orduz, Poliziak jokalariak irtenarazi zituen arte: 61 pertsona atxilotu zituzten.

2004/01/08. 63 demo epaitu zituzten Baionan trenbideetan karta-jokoan aritzeagatik. 33.000 euroko isuna jarri zieten (380 euro bakoitzari). Euskaraz deklaratu nahi zutenez eta epaileak utzi ez zienenez, indarkeriaren bidez irtenarazi zituzten. Zauritu asko egon ziren bertaratuen artean. Gainera, SNCFk "kalte-

203 Kamioian txandaka aritu ziren Sustrai Colina eta Maialen Lujanbio bertsolariak, Alaitz eta Maider, Selektah Kolektiboa, Fermin Muguruza eta Sorkun, danborrak, DJak musika jartzen eta Kukubiltxoren parodiak, Sorelle Leonen ahotsa (Wemean taldeko abeslari ohia)...

galerak" ordaintzeko eskatu zuen, eta auzitegiak onartu egin zuen. Hori zela-eta, 2005eko maiatzean enpresak gutun bat igorri zion Hervé Thepault demoari, bost egunen buruan "kalte-galerengatik" 10.923 euro ordain zitzala eskatzeko. Ordaintzen ez bazuen ondasunak bahituko zizkiola mehatxu egin zion.

2004/01/10. **Txandakako barauaaldia**. Ehunka pertsona joan ziren Euskal Herrian Euskarazek antolatutako txandakako barauaaldiaren hirugarren txandara. Ekimena Gernikan egin zen justizia-sistema gurea eta euskalduna izan zedila eskatzeko.

2004/01/19. **Biluzi solidarioa**. Itoitzekiko Elkartasuna taldeko bi emakumek gerritik gora zituzten arropak erantzi eta beren gorputzetan margoturik zituzten esloganak erakutsi zituzten, "Stop Itoitz" edota Artozkirekin elkartasuna adierazten zuten esloganak, Iruñeko Baluarte zentro berriaren ospakizunean. Han zeuden agintariei hauxe aurpegiratu zieten: "gure herrien hilketa ospatzen ari zarete". Bi solidarioen aurkako epaiketan bakoitzari 180 euroko isuna jarri zioten "desordena publikoengatik".

2004ko martxoa. **Desobedientzia zibila Atzerritarren Legeari**. Ehun bat nortasun-agiri nazional bildu zituzten eta Gobernuaren Bartzelonako Ordezkariordetzara eraman zituzten sinbolikoki, "Zuen demokrazia, zuentzat" goiburuaz. Horrez gain, programatu zuten pertsona bakoitzak bere burua errudun aitortzea eta erruztapen horiek jasotzea. Bertan pertsona bakoitzak adierazten zuen Atzerritarren Legeko zenbait puntu zigorgarri desobeditzen ari zela nahita eta halaxe egiten jarraituko zuela.[204] Horrekin Atzerritarren Legea salatu nahi zuten, immiganteei biltzen, lekualdatzen, elkartzen, sindikatuetan izena ematen edota osasun- eta hezkuntza-estaldura jasotzen uzten ez zien lege bat.

2004/07/25. **800 bat pertsonak arto transgenikoz landatutako lursail bat segatu zuten** Menvillen, Garona Garaian. Elkarrekin ekinez legeari aurre egitea erabaki zuten segalari boluntarioak ziren. Gilles Luneau kazetariak honela azaldu zuen Pioneer sozietatearen barietate transgenikoen entsegu-eremura egindako hurbilketa: "hirurehun autoz osatutako beldar luze eta koloreaniztun bat zeharka-meharka doa zelaian ordubete baino gehiagoan. Alkateak, kontseilariak eta udaletan, departamentuetan edo eskualdeetan aukeratutako beste kargudun batzuk dira taldearen buru". Hauexek izan ziren Gérard Onesta diputatu europar berdeak eta jendarme-buruak izandako hitzak:

- Aurrera egingo dugu, jendeari dagokio bere etorkizuna erabakitzea, ez agrokimikako multinazionalei.

204 Animatzaileak. Bakerako hezkuntza. http://animadores.iespana.es/animadores/edupaz00.html

- Gogorarazi behar dizuet beste norbaiten ondasunak txikitzea delitua dela.
- Erantzule egiten gara.Jakinarazten dizuet jendarmeek ez dutela zuen ekintza oztopatuko, baina uztak errotik ateratzen hasten diren pertsonen argazkiak hartuko ditugu.
- Egin zuen lana, guk gure zeregina egingo dugu.

Bastoiaren laguntzaz, gizon nagusi batek lerroak utzi eta jendarme batengana joan zen. Nortasun-agiria eta hautesle-txartela eman zizkion: "Jean Gravas dut izena, nire izena idatz dezazuen nahi dut"...

"Indarkeriarik ez, Poliziari irainik ez, gure etsaiak arto-kanaberak dira. Aurrera!" Ehunka pertsonak legeak hautsi eta lehenengo GEOak atera zituzten. Eta kanabera bat bakarrik pertsonako, "milaka izateko kanabera batengatik zigortuak". Eta eskuekin egin zuten, lanabesik gabe, hala erabaki zutelako denen artean: "Ez segarik, ez igitairik, ez aiztorik, gure eskuak soilik; horrela ezingo digute armak eramatea leporatu". 30 minutu besterik ez eta GEOen hektarea erdia jada ez zegoen hazten jarraitzeko moduan. Jendarmeek (argazkiekin) *metrailatu* zituzten 24x36arekin, modelo japoniarra, argentikoa. Baina segalari boluntarioak, irribarretsu eta lasai, prest zeuden ondorio judizialak onartzeko, bai eta herritarren beste ekintza bat hasteko ere. Hala zioen Sylviek, irakasle batek".[205]

2004/08/16 - 2004/08/20. **Iruñeko Euskal Jai gaztetxea husteagatik protestatzeko kazerolada solidarioak.** Gazteek gogor egin zuten eta **lau egunez teilatuko egituretara igo ziren behin eta berriz**. Bien bitartean, alde zaharreko auzotar askok **kazeroladak** antolatu zituzten **egunero 10.00etan, 14.00etan eta 20.00etan** (kazerolada horietako baten argazki bat Bidea Helburu taldearen logo bihurtu zen gero). Ehun urtetik gora zituen Iruñeko Euskal jai frontoia 10 urte eta 4 hilabetez hartu zuten gaztetxetzat. Polizia espainolak, polizia foralak eta udaltzaingoak, berriz, 10 egun behar izan zituzten guztiz husteko. 120 pertsona atxilotu zituzten (50 gaztetxean) eta 33ren aurkako akusazioak egin zituzten, zegozkien epaiketekin. Egin zitzaien akusazioa izan zen ondasun higiezinen usurpazioa eta autoritateari erresistentzia eta desobedientzia larria. Haietako biri, berriz, autoritateari atentatua eta desordena publikoak leporatu zitzaizkien.

2004/09/09. **Baserriaren galera ikusarazi zuten**. UAGAko nekazari eta abeltzainek Gasteizko kaleak hartu zituzten **beren behiekin eta 50 traktore baino gehiagorekin**. EHNEk ere gauza bera egin zuen 2008ko ekainaren 9an Donostian, "*Baserria herriaren nortasuna eta guztion osasuna. Borrokatu*

205 Gilles Luneau. *Por la desobediencia cívica* liburuaren hitzaurrea, Gilles Luneauk eta José Bovék idatzia. El Viejo Topo, Bartzelona, 2004, 11.-19. or.

*ala desagertu*” goiburuarekin. Behi eta ardiekin kalera irten, eta ekoizpen-kostuen igoera eta artekarien eta industriaren irabazi-marjina handiak salatu zituzten.

2004/11/07. Zentral atomikoetako hondakinekin beiratutako hondakin nuklearrak zeramatzaten 12 edukiontzi garraiatzen ari zen tren batek azpian harrapatu zuen **Sébastien Briat**, 21 urteko militante antinuklearra. Trena La Hagueko birprozesatzeko fabrika frantsesetik zetorren eta hondakin nuklearren gordailu aleman batera zihoan, Gorlebenera. Sébastien **trenbidera kateatu zen** Avricourtetik gertu, Meurthe-et-Mosellen, Nancytik 40 kilometro ekialdera dagoen udalerri batean. Europan hondakin erradioaktiboaren garraioaren aurka behin eta berriz egiten diren indarkeria-ezazko ekintza baketsu bat gehiago baino ez zen. Istripu lazgarria gertatu baino zertxobait lehenago, militante antinuklearrek trena blokeatu zuten Laneuvevillen trenbidera kateatuz, baina konboiko segurtasun-guardiek bidali egin zituzten. Istripua gertatu zen unean, trena baimenduta zegoena baino azkarrago zihoan (100 km/h gutxi gorabehera) eta zaintzako kanpoko zerbitzuek esan zuten ez zutela gaztea ikusi bihurgune baten ondoren zegoelako eta helikopteroa depositua betetzen ari zelako. Tren-konboiak **bi hankak moztu zizkion** eta gaztea **larrialdi-zerbitzuen arreta jaso baino lehen hil zen**.[206]

2004/12/17. Demoetako bi kide atxilotu zituzten, haietako bat Gustave Coubert margolariaz mozorroturik. Baionako tren-geltokiko idazkunak bi hizkuntzetan margotu zituzten, eta komisarian sei ordu igaro eta gero, “*composition pénale*” bat irekiko zitzaiela jakinarazi zitzaien. Modalitate juridiko hori **Perben Legea**n jasotako berritasun bat zen. Akusatuek beren errua onartzen bazuten, fiskaltzak zigor bat proposatuko zien eta, onartzen bazuten, ez zen epaiketarik izango. Kasu horretan, 790 euroko isuna izango lukete **“ondasun publikoak nahita degradatu izana” aitortuko balute. Demoek erantzun zuten beren ekintza “interes publikoaren mesedetan”** zela, eta, beraz, ez zutela ordainduko eta epaiketara joango zirela.

2005/01/15. **Ez badigute ematen, eraiki egingo dugu**. **Euskal Herriko Laborantza Ganbara** sortu zen Ainhize-Monjolosen ELBren ekimenez. Mila pertsona inguru joan ziren inauguraziora eta Ipar Euskal Herriko herritarren zati handi batek eman zion babesa talde honen sorrerari. Administrazio frantsesak uko egin zionez euskal laborarien behar eta iritziak jasoko zituen proiektu bat martxan jartzeari, ELBk laborantza-ganbara kudeatzeko eredu hori bultzatu zuen behetik eta era kolektibo eta parte-hartzailean. Euskal Herritik bertatik pentsatutako kudeaketa-eredua zen (autonomia teknikoa,

206 http://www.terra.org/articulos/art00983.ht

ekonomikoa eta finantzarioa; ustiategiak ez pilatu, baliabide urriak errespetatu, produktuen kalitatea eta garapen lokala). Nekazariek, erakunde sindikalek, kontsumitzaileen elkarteek, ingurumena babesteko elkarteek eta nekazaritza- eta landa-garapeneko taldeek osatzen zuten osoko biltzarra.[207] Eraikuntza-adibide garbi bat.

2005/02/12. Desobedientzialariak eta ABK taldeetako kideek **160 nortasun-agiri** espainol eta frantses **eraman zituzten** Bruselara, euskal naziotasuna aldarrikatzeko. Europako Aliantza Libreko (EAL) presidente Nelly Maesekin elkarrizketa izan zuten –EAL Europako 23 talde nazionalista eta erregionalista biltzen dituen aliantza zen–, bai eta Berdeen eurodiputatu Bart Staesekin ere –bere alderdiak EALrekin taldea osatzen zuen Europako Parlamentuan–. Adierazpen batean, honela definitu zuen neurria ABK-k: “bizi dugun eskubide-zapalketa ezagutzera eman nahi duen ekintza baketsua da, onartzen ditugun ondorio penalak izan ditzakeena”.[208]

2005/06/18. **Dantza-maratoia, euskararen normalizazioagatiko borroka ez dela geldituko antzezteko**. Ekintzari “ManiFESTAldia” deitu zitzaion eta, lekua, nola ez, Baionako tren-geltokia. Deialdia ere, nola ez, Demoena, eta goiburua: “*Eskubide berak denentzat! Euskara bizi publikoan orain!*”. Gelditu gabe dantzan denbora gehien egiten zuenak irabazten zuen “Mutxiko txapelketa”, eta Patxi Pérez zen girotzen zuena. Hala, dantzan jardun zuen pertsona-talde handi samar batek, batez ere gaztez osatuak, turistek harriturik begiratzen zieten bitartean.

2005/07/07. **San Ferminetako entzierroa**. KEM taldeko lau antimilitarista Getxoko Sener fabrikan sartu ziren, G8ak Eskozian egin behar zuen goibileragatiko nazioarteko protestaren egunean. Haietako bi suteetako eskailera batera kateatu ziren eta pankarta bat zabaldu zuten. Pankartan hauxe jartzen zuen: “En Sener se fabrican armas. Hay que reciclar la industria militar”. Kanpoaldean, txupinazo baten ostean, adardun misilez mozorroturiko pertsona batzuek zuriz eta zapi gorriz jantziriko beste batzuen atzetik korrika egin zuten. Adardun misilak Senerrek egiten dituen “Taurus” misilak antzezteko ziren. Ertzaintza etorri zen antimilitaristak bidaltzera. Joanarazten zituzten bitartean, antimilitaristek “En vez de un misilazo, mejor un chupinazo” edo “Con el Eurofighter haremos bicicletas” oihukatzen zuten.

2005/11/10. **Kaiera**. Milaka pertsonak eskubide zibil eta politikoei buruz zituzten ideiak adierazi zituzten koaderno handi batean idazki labur, marrazki,

207 www.ehlgdoitvivre.com eta “Gai Monografikoak”, 34. Manu Robles-Arangiz Institutua, 2008ko abendua.

208 EFE, http://www.grupotortuga.com/Movimiento-de-desobediencia-civil webgunean jasota.

argazki, poesia, esaldi, hitz eta abarren bidez. 18/98 lantaldearen ekimena izan zen. Proposamen berezia zen; izan ere, elkartasuneko sinadura tipikoa eskatu beharrean, bakoitzari bere ideiak azaltzeko aukera eman zioten, baita ideia horiek Kaierako sustatzaileenarekin bat ez bazetozen ere. Horrek balio eta aniztasun handiagoa eman zion ehun pertsona ospetsu buru zituen ekimen hari.

2006. **Ekopiratak.** Farley Mowat itsasontzitik, baleak arrantzatzen zituzten ontzien aurka ekiten zuen talde bat zen *Sea Shepherd Conservation Society* (Itsasoko Artzaina Kontserbazio Elkartea). 40 "bidaiari" ziren, eta itsasontziko kapitaina, Paul Watson, Greenpeaceko kide ohia. Ekintza zuzena erabiltzen zuten beren zodiac-ekin sare pelagikoa erabiltzen zuen arrantza oztopatzeko (konfiskatu egiten zituzten). Baleak eta beste espezie batzuk arrantza ilegaletik urruntzen zituzten edo zenbait objektu jaurtitzen zituzten itsasontzien helizeetan korapila zitezen. "Ez dugu inor zauritzen, baina materialei erasotzen diegu. Baleontziren bat hondoratu ere hondoratu dugu".[209]

2006/03/18. Milaka pertsonak agur esaten zioten Elkarriri eta Lokarriri ongietorria egin zioten manifestazio batean Bilbon pankarta honen atzean: "Guztion artean: paz, acuerdo, consulta".

2006/03/19 - 2006/03/20. "**Erresistentzia zibileko indarkeria-ezazko ekintzen mundu-deialdia"k koordinatutako ekintzen lehenengo eguna**. Asmoa zen gobernu estatubatuarrak eta britainiarrak mundu osoan zehar zituzten instalazioetan zenbait ekintza egitea, **Irakeko okupazio militarra amaiarazteko**. Talde eta pertsona sustatzaileen artean hauek zeuden, besteak beste: Joseph Mulligan, Bakearen Nobel Saria eta Literaturako Nobel Saria jaso duten pertsona asko, Cindy Sheehan eta bakearen eta giza eskubideen aldeko beste aktibista batzuk, zenbait tradiziotako erlijio-liderrak, kontzietzia-presoak, artistak, kazetariak...

2006/03/31. **Bi amona** –Greenham Commoneko protestetan parte hartu zuten– Tony Blairen gobernu laboristak onartutako legedi antiterrorista berriaren lehenengo biktimak bihurtzeko zorian zeuden, eta lege horren aurka egiteagatik kartzelan urte bat eman beharko zuten. Polizia militarrak Helen John, 68 urtekoa, eta Sylvia Boyes, 62koa, atxilotu zituen egun hartan, **paseo motz bat emateagatik (bost metro besterik ez) Menwith Hill base estatubatuarreko zentinelek erabiltzen zuten segurtasun-bide batetik. Bi amonen asmoa zen lege berriaren aurka zeudela adieraztea,** Krimen Antolatuaren kontrako Legearen aurka zeudela, hain zuzen ere. 12 ordu eman zituzten atxiloturik eta gero fidantzapeko askatasuna eman zieten. Bi emakumeak, bien artean 10 biloba zituztenak, dozena bat aldiz baino gehia-

209 *Zazpika*, 377. zk., 2006/04/16.

gotan izanak ziren atxilotuak. Aurreko egunetan **hamar bat basetan sartu ziren**. Ekintza honetarako aliketak, mailua eta pankartak zeramatzaten. Estatu Batuen politika militarra salatzeko eta Diego García eta Chagos uharteetako biztanleei beren babesa adierazteko deklarazioak zituzten prestaturik. Izan ere, Diego García eta Chagos uharteetako biztanleak beren etxeetatik bota zituzten han base militar estatubatuarrak jartzeko. Legedi berriak base militar ingeles batean baimenik gabe sartzen zen edonor terrorista potentzial bihurtzen zuen, eta, beraz, kartzelara joan zitekeen urte batez edo 5.000 liberako isuna jaso zezakeen.

2006/05/15. Ehunka pertsonak lagundu zieten Orleansko Auzitegian (Frantzia) apelatu zuten **49 uzta-biltzaileei**. 2004. eta 2005. urteetan Grenevillen eta Neuvillen **genetikoki eraldatutako (GEO) arto-sailak hondatu izana leporatu zieten**. Aurreko egunean, milaka pertsonaz osatutako manifestazio batek Orleansko kaleak hartu zituen Nekazarien Ligak, Greenpeacek, Attac-ek, PC frantsesak eta Berdeak taldeek deiturik.

2006/05/27. **Porruak eta ez borrak**. Mungiako Soietxe kuartel militarrera urteroko martxa. 17. martxa zen, eta hainbat eta hainbat lagun zihoazen "*Bota kuartelie eta erein porrue*" zioen pankartari jarraiki; motor bat ere bazihoan, sidekarrean armadako goi agintari bat antzezten zuen pertsona batekin. Uniformea kendu eta baserritarrez jantzirik kuartelaren sarrerako lursailetan porruak ereiten hasi ziren, laborantzarako lursailtzat erabil zitezen errebindikatzeko.

2006/06/17. **Elkarrizketaren aldeko lehen aulki-zirkuluak**. Aulki-zirkuluetako lehena *artamugarri* edo Sorbituaga-Arriatarako monolitoaren inguruan egin zen, Gernikako garai bateko Astra arma-fabrika kultura-gune eta herritarren gune bihurtzearen "0 kilometroa" aurkeztu zenean. Ekintza horretan zehar, ArtamugarriaK talde artibistaren Pax Avant! kanpainaren bideoa filmatu zen. Handik bi hilabetera, abuztuaren 19an, elkarrizketaren aldeko lehen aulki-zirkulura deitu zuten Nafarroan, Larrako San Martin harrian, Pirinioetan. Hantxe egin ohi zen Hiru Behien Zerga, egun indarrean dagoen Europako bake-itunik zaharrena (1375). Hortik hartu zuen ArtamugarriaK taldeak bere kanpainarako euskal gatazkari buruzko goiburua, "Pax Avant!" juramentua.

2006/06/20. **Mailukadaka misil baten aurka**. Madan, Hidatsa: nazio arikara Ipar Dakotan, Estatu Batuetan. Echo-9 kontinentearteko misil nuklearren jaurtiketa-postura hurbildu ziren hiru pertsona, ateko giltzarrapoak apurtu eta bakearen sinboloa zuten pankartak eta kartelak jarri zituzten. Beren odol apur bat isuri, mailuekin jaurtiketa-plataforma kolpekatu eta atxilotuak

izan arte itxaron zuten. Haietako bat 73 urteko Carl Kabat apaiz katolikoa zen, armamentu nuklearraren aurkako erresistentziaren historia zabala zuena, "Suntsipen handiko armak golde bihurtuko dira" taldeko kidea; beste biak 52 urteko Greg Boertje-Obed eta 58 urteko Mike Walli gerra-beteranoak ziren, biak Dulutheko "loaves and fishes" (ogiak eta arrainak) taldekoak. Pailazoz jantzirik zihoazen, suntsipen- eta heriotza-egiturak eraldatzen saiatzeko umorea eta barrea elementu beharrezkoak zirela azaltzeko. Baina Minuteman II misilaren suntsipen-indarra Hiroshiman jaurtitako bonbarena baino hogei aldiz handiagoa zen.

2006/07/12. **Zanpantzarrek aurre egin zioten Israelen armadari Bilíinen.** Bilíinen, Ramalaren ondoan dagoen herri batean, istilu bitxi bat gertatu zen zintzarriz eta albokaren bat edo bestez "armaturiko" euskaldun gutxi batzuek eta bandera palestinarrak eta ikurrinak zeramatzaten ehunka palestinarrez osatutako talde baten eta Israelgo armadaren artean. Azkenean tiroka hasi zen armada, baina orduko hartan ez zen ez hildakorik ez atxiloturik egon; horren ordez, egunero erasoak jaso eta nazioarteari berdin zaiola ikusten duen herri baten esker oneko adierazpenak egon ziren. Judimendiko Momotxorroak taldeko zanpantzar gasteiztarrek leher eginda, ia deshidrataturik, baina oso pozik amaitu zuten saioa. Horrelaxe azaldu zieten protesta-modu bitxi honetako protagonistek palestinarrei beren ekintzaren zentzua testu batean:

> "Martxa erritual honekin, gure arbasoek uste zuten lurra esnarazten zutela zintzarrien hotsarekin neguko lozorroaren ondoren, eta espiritu gaiztoak uxatzen zituztela zaldi-buztana astinduz. Gaurko ekintza honekin, zanpantzarrak menditik jaitsi dira mundua esnarazteko eta Palestinan jar ditzan begiak, gurearen moduan eta munduko beste herri askoren moduan, desagertzeari uko egiten dion herri honetan.

Ostiralero, Nazioarteko Solidaritatearen Mugimenduak horrelako ekintzak antolatzen zituen Israelek Zisjordanian eraikitako Apartheidaren harresiaren aurka. Indar israeldarrek, protestan nazioarteko taldeek parte hartzen zutela ikusirik, ez zuten horren bortitz jokatu, baina, hala ere, gasak eta kautxuzko balak jaurti zituzten. Korrika egin behar izan zuten guztiek babestu ahal izateko, "baina Euskal Herrian antzeko egoeretan jasotako eskarmentuak balio izan digu lasaiago egoteko eta geure onetik ez ateratzeko", adierazi zuten solidario euskaldunek. Ramalako jaialdi batean parte hartzeko antolatu zuten Palestinara bidaia, baina urte hartako egoera larria zela-eta, jaialdia bertan behera geratu zen. Judimendikoek, orduan, beren emanaldia aldatu eta elkartasuna adierazteko eta egoera salatzeko ekintza bat bihurtzea erabaki zuten.[210]

210 http://www.grupotortuga.com/Los-zanpantzar-hacen-frente-al

2006/07/16. **AHTri buruzko erreferendumak**. Urbinako biztanleek AHTrik nahi ez zutela berretsi zuten erreferendumean. Erreferenduma egin zuen lehenengo udalerria izan zen. Beste herri batzuek beren iritzia eman ez zezaten[211], 2007ko irailaren 28an Paulino Luesma ordezkari espainola Aramaioko **udal-kontsulta eragozten saiatu zen**, eta herri horretan AHTri buruz egindako inkestak fiskaltzara eraman zituen urriaren 1ean. Luesmak AHTri buruzko kontsulta eragoztea agindu zuen berriz ere Elorrion 2007ko azaroaren 16an. Hala ere, 2007ko abenduaren 2an kontsultak egin ziren Elorrion eta Anoetan. Gehiengoak ezetz esan zion AHTri bi udalerrietan.

2006/10/14. Baketik bake-zentroa sortu zen, Arantzazuko santutegiko frantziskotarrek bultzaturik. Beste hainbat jardueraren artean, **adiskidetze-agenteen sare bat sortzeko programa bat zuen**; 5.000 pertsonak parte hartu dute bertan.[212]

2006/11/03. Emakume palestinarrek **beren gorputzak jarri zituzten bala israeldarren eta milizianoen artean**.

2006/11/24. Ipar Dakotan **sinbolikoki misil bat kolpekatu zuten** aktibisten aurkako epaiketa. Arraia zuridun uniforme beltzak eta praka urdinak jantzita azaldu ziren gorte federalaren aurrean epairako. Carl Kabat apaizari 15 hilabeteko kartzela-zigorra ezarri zioten. Greg Boetje-Obedi 12 hilabete eta egun bat, eta Michael Walliri, berriz, 8 hilabete. 17.000 dolar ordaintzera ere kondenatu zituzten. Aktibistek argi eta garbi onartu zuten arma nuklearra suntsitzen saiatu zirela. Adierazi zioten epaimahaiari misil horietako bakoitza “erabateko suntsipeneko arma suntsitzailea dela, sarraskiak egiteko makina, ehun milaka pertsona hiltzeko diseinatuta dagoena, hain zuzen ere”. Ipar Dakota soilik hartuta, buru nuklearrak jaurtitzeko prestatuta zeuden beste 150 toki zeuden. Epaiketan, Carl Kabat apaizak, ordurako 16 urte kartzelan eman zituenak protesta baketsuak egiteagatik, hauxe esan zuen:

> “Uste dut zuek, epaile eta fiskal jaunok, badakizuela E-9an dauden Minuteman III misilak gaiztoak, ezmoralak eta ilegalak direla, baina zuen ekintzek gaiztotasun, ezmoraltasun eta legaltasunik ez hori babesten dute. Epaile jauna, zu beste Rosa Parks bat izan zintezkeen, baina zure ekintzen diote EZ. Gu guztiok Ipar Korea kondena dezakegu askatasun osoz eta publikoki arma nuklearrak dituelako. Irak kondena

211 2006ko abenduaren 3an Itsasondoko biztanleek ezezko biribila eman zioten AHTren proiektuari erreferendumean. Gauza bera egin zuten Arabako hiriburuko 18 udalbatzak ekainaren 29an. 2007an, Atxondo (martxoaren 25ean) eta Angiozar udalerriek egin zuten bozketa. Apirilaren 1ean Alegian egin zen herri-kontsulta, eta gehiengoak AHTren aurka zegoela adierazi zuen. Era berean, Mugerren (2.275 boto kontra eta 198 alde) eta Uztaritzen (2.592 boto kontra) ere ezezkoa eman zioten LGV abiadura handiko trenen sareari 2008ko martxoaren 9an, udal-hauteskundeak eta hauteskunde kantonalak aprobetxatuz. 2009ko otsailaren 15ean Legorretan egin zen erreferenduma, nahiz eta EAJk boikota egin zion.

212 http://www.baketik.org/

dezakegu askatasun osoz eta publikoki arma nuklearrak dituelako, eta haiekin gerra bat egin dezakegu. Iran kondena dezakegu askatasun osoz eta publikoki garapen nuklearragatik, baina, ezin ditugu Estatu Batuak kondenatu gauza beragatik?". Orduan Kabatek desafio egin zien guztiei: "Zer helburu dute ëerregutu bakearen aldeí dioten errezoek, gero mila milioi dolar gastatzen baditugu urpeko armatu atomikoetan, arma termonuklearretan eta misil balistikoetan?".[213]

2006/11/19. Ehunka palestinarrek osatutako "**giza ezkutu**" batek Israelen erasoa eragotzi zuen. Gazako zerrendako etxe bat bonbarda ez zezaten lortu zuten horrela.

2007/02/04. **Bilboko Esperantza Frontoia**. Auzitegi Gorenak sei urteko kartzela-zigorra ezarri zien "Jarrai-Haika-Segi" sumarioan epaitutako hemezortzi gazteei. Haiek bilatu eta atxilotzeko agindua emanda zegoen urtarrilaren 19tik. Gazteak Esperantza frontoian aurkeztu ziren publikoki, hamabost egunez poliziaren kontrolak eta jazarpenak saihestu eta gero. Han, senideekin eta hirurehun bat pertsonarekin batera, "*Ireki aukerak independentziari. Euskal gazteria aurrera!*" zioen pankarta bat zutela, Ertzaintzak atxilotu zitzan uztea erabaki zuten. Ertzainek eraikinetik atera zituzten banan-banan eta furgoietan sartu zituzten, bertaratuen kantika eta kontsigna artean. Aurrez, gazte batek hitza hartu zuen ekiteko aukeratu zuten era eta helburua azaltzeko: frontoiaren barruan eutsiko zioten era baketsuan, bertaratu guztiak lurrean eserita egongo ziren, ez zitzaien probokazioei erantzungo, eta Ertzaintza frontoian sartzean ez zioten laido edo oihu iraingarririk egingo. Eta halaxe izan zen. Ertzaintza jarraika zuten gazte haiek ezkutuan jarrai zezaketen, baina beraiek erabaki zuten non eta nola egingo zen beren atxiloketaren argazkia eta bere aurkako epaiketa "politikoa zela" erakutsiko zutela. Espetxera eraman zituzten guztiak eta bakoitza Espainiako leku desberdin bateko kartzelara bidali zuten.

2007/05/16. Bi pertsona **zementu-bidoi batera kateatu ziren** Iruñean. Bien bitartean, 50 pertsona inguru galtzadan eseri ziren, **"Iruñerria piztera goaz"** izeneko desobedientzia zibileko kanpainaren barruan. Gizalegezko udal-ituna eta aurreko hiru urteetan **22 gaztetxe hustu izana salatu nahi zituzten**, bai eta Xabier Errearen askatasuna eskatu ere. Pertsona horietako hamabi prozesatu egin zituzten eta fiskaltzak 2 urte eta erdiko kartzela-zigorra eskatu zuen.

2007/05/17. **"Egin bidea bakeari. Abramos camino a la paz**" ekimenaren lehenengo eguna Donostiako bulebarrean. Era askotako taldeak eta

213 http://www.grupotortuga.com/Penas-de-prision-para-activistas Informazio gehiagorako, ikusi "loaves and fishes" (ogiak eta arrainak) komunitatearen edo Nukewatch taldearen webguneak. Han aurkitu ahal izango dituzue kasuaren eguneratzeak, irudiak, helbideak eta defentsak. Johan House webgunea ere bisita dezakezue.

pertsonak bildu ziren hilabete bakoitzeko lehenengo eta hirugarren ostegunetan **elkarrizketaren aldeko aulki-zirkulu batean** esertzeko **(**Pax Avant! ideiari jarraituz). Isiltasuna erabiltzen zuten adierazteko bakea nahi zutela eta erantzukizunak zituztenek berriz ere eseri behar zutela, haiek egiten zuten moduan, bake-prozesu bat irekitzeko. Elkarrizketa, indarkeria-eza eta herritarren parte-hartzea defendatzeak batzen zituen. Batzuetan artistak, musikariak, poetak, gizarte-eragileak eta halakoak gonbidatzen zituzten ekintzak irauten zituen 15 minutuetan parte hartzera.

2007/06/03. **Bardea-Tibesti**. ArtamugarriaK taldearen ekintza bat izan zen, bake-prozesuari babesa emateko eta demokrazia partizipatiboaren alde egiteko ekimen artibista. Bardeako tiro-eremurako XX. martxan zehar egin zen. Tibestiko (Txaden iparraldea) Tubu herriari elkartasuna adierazteko Pax Avant! kanpainaren barruan Tibesti GKErekin batera egindako proiektu baten lehen zatia izan zen. Proiektua aurrerago Zouarreko batailaren gertalekuan egingo zen, munduko mina-eremurik handienean. Ekintzak honetan zetzan: **martxan zihoazenek giza triangelu handi bat osatu zuten** eta triangeluaren erdian **elkarrizketaren aldeko aulki-zirkulua eta gatazken zuhaitza edo gatazken maiatzeko zuhaitza** zeuden. Gerretan bonbardatutako herrien izenak idatzirik zituzten kartelekin osatuta zeuden. Ekintzan tubuen printzearen eskutitz bat irakurri zuten.[214]

2007/07/17. BatzArt! taldeko aktibistek **dei egin zioten ETAri herritarrekin aulki-zirkulu batean eser zedin armarik gabe** eta su-etena hausteko erabakia berriz hausnar zezan.[215]

2007/09/27 - 2007/09/29. **Elkarrizketa *artibista, kreaktibo* eta parte hartzekoak** herritarren artean eta herritarren eta erakundeen artean, Gernikan egin zen Artea eta Bakearen Nazioarteko III. Topaketan. "Gernika foru-hiribildu zaharretik, demokrazia humanista eta zuzenaren lurretik, eta bere haritzaren inguruan, **herritarrek artearen bidez bake-prozesuan parte hartzeari buruz eztabaidatzeko artisten batzarra** biltzen dugu", azaldu zuen Gernika Gogoratuzek. Honako hauek hartu zuten parte: Gales, Austria eta Israelgo zapalduaren antzerkiko eta antzerki legegileko taldeek; Ipar Irlanda, Australia eta Hegoafrikako komunitate-artistek; eta Libano, Rif eta Euskal Herriko artibistek. Azken horien artean, elkarrizketaren aldeko aulki-zirkuluen bultzatzaileak zeuden. Azken egunean BatzArt edo Asanblea Kreaktibo bat antolatu zen "Haranak eta Mendiak" (edo *Nabak eta Arroak*

214 Ekintza guztia grafikoki dokumentatu zen eta www.artamugarriak.org webgunean dago jasota.

215 Eskaera eskutitz ireki baten bidez egin zen. Uztailaren 17an *Berria* egunkarian eta *Noticias* taldean argitaratu zen; 20an *Gara* egunkarian, eta 21ean, berriz, *Deia* egunkarian.

Nafarroari erreferentzia egiteko) instalazioaren gainean. Preso politikoen pankartaz hutsez eta kleraz lurrean margotutako ETAren biktimen silueta hutsez osaturik zegoen instalazioa.

2007/12/22. **Renfe eta EuskoTreni txartelak ez ordaintzeko deia egin zuten AHTren proiektua salatzeko**. AHT Ez Ordaindu! kanpainaren bultzatzaileek informazioa banatu zuten.

2008/01/16. Donostiako alde zaharrean Raimundo Sarriegiri eskainitako eskulturan dagoen **danborrariaren ondoan emakumezko urketari bat jarri zuten**. Horrekin, Bilgune Feministak azaldu nahi zuen berdintasuna ez dela iritsi oraindik gizarteko alor guztietara eta, danborraden kasuan, oraindik asko geratzen dela egiteko pertsona guztiek berdintasunean goza ahal izan dezaten festaz, sexua kontuan hartu gabe.

2008ko otsaila. **Bakearen aldeko aulki-zirkulua** hasi zuten Bilbon. Hilabete bakoitzeko lehenengo asteartean biltzen ziren Oteizaren estatuaren alboan, udaletxearen parean.

2008/03/22. **NATOren egoitza itxi zuten sinbolikoki Bruselan**. 17 herrialde europarretako mila bat pertsonak indarkeria-ezazko ekintza bat egin zuten basearen inguru osoan zehar, NATO Iraken eta Afganistanen egiten ari zena salatzeko. Poliziak zakurrak eta kanoiak erabili zituen aktibistei jarraitzeko, eta 450 pertsona atxilotu zituzten, haien artean KEMeko bi euskaldun.

2008/06/16. **Ondasunak zikintzea**. Santurtziko Andrea Lafuente Garcíaren aurkako epaiketa. Ministerio fiskalak lau egunez lokalizazio iraunkorreko zigorra ezartzeko eskatu zuen, BBVAren egoitzan "ondasunak zikintzearen" falta batengatik. Hauxe da auzipetutako aktibistak abokatu defentsariaren galderei emaniko erantzunen transkripzioa:[216]

> **Abokatua:** Zer lotura duzu leporatzen zaizkizun gertaerekin?
>
> **Andrea:** BBVAren aurkako plataformako kide naiz. Talde askok hartzen dute parte plataforma horretan: Komite Internazionalistak, Kakitzat, Ekologistak Martxan, KEM, CGT, Pakea eta Duintasuna eta STEE-EILAS taldeek. Partaidea naizenez, bileretan eta salaketa-ekintzetan parte hartzen dut. Maiatzaren 14an Abandoko iturrian bildu ginen BBVAk gerrak finantzatu eta ingurumena txikitzen duela salatzeko. Hiru pertsona lurrean etzan ziren bankuak diruagatik eragiten dituen heriotzak antzezteko. Pertsona horien profilak margotu genituen eta zenbait mezu informatibo idatzi genituen jasota gera zitezen, esaterako, "BBVA financia guerras" edo "Matanza de indígenas".
>
> **Abokatua:** Zer pintura-mota erabili zenuten?

216 http://bbvahiltzaile.blogspot.com/

**Andrea:** Ur-pintura zuria zen. Distiratsua. Kontraste polita egiten zuen zoru grisaren zikintasunarekin.

**Abokatua:** Zer parte-hartze izan zenuen gertaeretan?

**Andrea:** Nik marraztu nituen hildakoen profilak eta lurreko mezuak.

**Abokatua:** Uste duzu egia direla zuri zikintzearen falta leporatzeko erabili diren egitateak?

**Andrea:** Ez. Erabili genuen pintura kasu zehatz baterako zen eta erraz kentzen da urarekin. Pintaden ondoren, BBVA zegokion bezala zegoen. Askoz okerrago dago egia ezkutatzen denean.

**Abokatua:** Pintura han al zegoen oraindik hurrengo egunean?

**Andrea:** Ez. Dena garbi zegoen.

**Abokatua:** Gehitu nahi al duzu ezer?

**Andrea:** 2006. urtean BBVA armamentua finantzatu zuen bankurik handiena izan zen Italian. Industria militarrean parte hartzen duten enpresetan akzioak ditu. Gainera, irabazi handiak izaten ditu ingurumenaren eta pertsonen eskubideen aurkako krimenen kontura.

2008/06/27 eta 2008/06/28. "**Elkarrizketak indarkeria-ezari buruz**, gizartea eraldatzeko eta bakerako bideari buruz", 14 taldek antolatu edo babestuta Donostian. "Gure gatzaren ibilaldia" izeneko dokumentu garrantzitsua, www.noviolenciactiva.org eta www.solasaldiak.org web orrietan.

2008/08/03. **Zementu-bidoietara kateaturik eta autobusen gainera igorik.** Horrela protestatu zuten AHTren aurka Donostian, Askatasunaren hiribidea eta Kontxa pasealekua elkartzen diren lekuan, hainbat aktibistak; ibilgailuen zirkulazioan izugarrizko kaosa sortu zen. Maiatzaren 24an beste bi pertsona hondeatzeko makinetara kateatu ziren Ordizian.

2008/09/17. **Finantza-intsumisioa**. Bankuaren intsumiso Enric Duranek adierazi zuen bi urtean 492.000 euro lortu zituela 39 bankutatik "besteak beste, BSCH, Deutsche Bank, BBVA, La Caixa edota Caja Madrid" kreditu pertsonalak eskatuz gezurrezko enpresen bidez, eta ez zuela dirua itzuli. Duranen hitzetan, "bankuek kontrol, arriskuen prebentziorako neurri edota sen ona erabili beharrean familiak zorpetzea bultzatzen dutela erakusteko besterik ez zen". Hainbat mugimendutan parte hartzen zuen militante honek "hala nola, kanpo-zorra abolitzearen aldeko sarean, erresistentzia orokorreko mugimenduan edo Munduko Bankuaren eta kapitalaren Europaren aurkako kanpainetan" dirua zenbait erakunderi eman ziola zioen, horregatik deitzen zioten "bankuetako Robin Hood". Horrez gain, "Crisi" argitalpena ordaintzeko ere erabili zuen dirua, eta argitalpen horretan **banku-erabiltzaileek greba**

egiteko kanpaina bat proposatzen zuen. Ihes eginda zegoela, honako ohar hau idatzi zuen bere blogean[217]: “zuen agendetan martxoaren 17a markatzea nahi dut: 17-S ekintza baino 6 hilabete geroago eta G20ren bigarren goi-bilera baino 15 egun lehenago une egokia izango da etxera itzuli eta nire askatasun defendatzeko”. Halaxe egin zuen. Baina 50 mosso d’esquadrak “haietako 20 kalez jantzita eta aurpegia estalirik” atxilotu egin zuten 2009ko martxoaren 17an, jendeari beste 17 bat proposatzen ari zen bitartean: 2009ko irailaren 17a zen, hain zuzen ere, eta egun horretan **herritarrek bankuetatik diru guztia atera eta maileguak eta hipotekak ordaintzeari uzteko** eskatu zuen. Horrez gain, martxoaren 17an *Podemos* egunkaria aurkeztu zuen, eta ekintza-plan postkapitalista bat proposatu zuen bertan. Egunkariko orrietan zenbait ideia irakur zitezkeen, hala nola, enpresa kapitalistentzat lan egiteari uztea, sistemak erabiltzen ez dituen edo gehiegi erabiltzen dituen oinarrizko zerbitzuen fakturak ez ordaintzea edota alokairuen kuotak gutxitzea edo ordaintzeari uztea.

2008/10/19. **Bakearen aldeko gatzezko mandala Zurriolako hondartzan**, Donostian, Ikertze, ArtamugarriaK eta Oteizaren Lagunak taldeen ekimenez. Parte hartzezko ekintza, bakearen eskaera eta Jorge Oteiza batzen zituena haren jaiotzaren mendeurrenean. Edozein pertsonak egin zitzakeen koloretako gatzekin marrazkiak eta esaldiak gatzezko zirkulu handiaren barruan. Testu-mezuak ordenagailu eramangarri batean tekleatu zituzten, eta, artistek emandako irudiekin batera, *pendrive* batean sartu zituzten. *Pendrive* hori Cardhu whiski botila huts baten barruan sartu zuten, Oteizaren gogokoena baitzen Cardhu whiskia, eta *pendrive*arekin batera gatza eta Donostiako orratz bat sartu zituzten. Botila itxi eta bufanda gorri bat jarri eta gero (oso oteizianoa), surflari batek itsaso zabalera eraman zuen txalupa bateraino eta, **Orio, Zarautz eta Donostiako traineruek lagundurik**, itsaso zabalean jaurti zuten.

2008/11/09. **Lokarrik herri-kontsulta bat antolatu zuen Gernikan** galdera honekin: “Uste duzu komenigarria eta legitimoa dela herri-kontsultak deitzea bakerako prozesua bultzatzeko eta era demokratikoan eta bazterkeriarik gabe bizi ahal izateko aukera emango digun akordio politiko bat eskatzeko?”. 2.034 herritarrek hartu zuten parte kontsultan, erroldaren %17k. Parte-hartzaile guztien artetik, %99,41 kontsultak egitearen alde agertu zen. Gernikako biztanleez gain, foru-hiribilduan bizi ez ziren beste 3.500 pertso-

217 http://www.enricduran.cat/es/sobre-mi-situacion-legal-y-fecha-de-vuelta Enric Duranek ekintza azaltzen duen bideoa: http://blip.tv/file/1735250 Crisi: http://www.17-s.info/sites/default/files/publicacion/crisi.pdf

nak parte hartu zuten ekimenean Interneten bidez. Paul Ríosek hauxe idatzi zuen bere blogean:

> "Bozkatzera joan ziren pertsona guztiek kontsulta ez-ofizial bat aurkitu zuten, izaera sozialekoa baina seriotasunez prestatua eta garatua, eta edozein bozketari dagozkion oinarrizko printzipio demokratikoak bermatzen zituena. Esperientzia oso pedagogikoa izan da. (...) Erakutsi dugu posible dela kontsulta bat antolatu eta egitea. Bakerako eta normalizaziorako baldintzak finkatzen lagundu dugu era aktibo eta berritzailean eta zuzenean parte hartzeko aukera erraztuz. (...) Erakutsi dugu ez dugula etsitzen eta ez diogula indarkeria, bazterkeria eta elkarrizketarik gabeko egoera negatibo honi gu garaitzen uzten. Herri-kontsulta proposatu genuenetik urte eta erdi pasatu eta gero, pauso bat gehiago eman dugu egoera behin betiko desblokea dadin eta bakerantz aurrerapausoak eman ahal izan ditzagun".[218]

2008/11/09. **Antinuklear aleman batzuk trenbideko zementu-blokeetara kateatu eta hondakin nuklearrak zeramatzan konboi bat 12 orduz geratzea lortu zuten**. 16.000 polizia eta dirutza itzela "20 milioi euro" behar izan zituzten "betiereko zaborrez" kargatuta eta helikoptero polizialez lagunduta zihoan trena helmugara irits zedin. Gorlebeneko hondakin nuklearren zentroa (Alemania) zen helmuga, eta **40 orduko atzerapenaz** iritsi zen trena. Tren-seinaleen sistemetan hiru sabotaje izan ziren eta horrek zirkulazioa zaildu zuen eskualde osoan, baita Berlin eta Hamburgen arteko abiadura handiko konexioan ere. Gorlebenen inguruetan, Polizia eta herritarrak katua eta saguaren moduan ibili ziren; herritarrek blokeoak antolatzen zituzten zenbait sarbidetan eta poliziak bidali egiten zituen. Hainbat aktibista trenbideetara kateatu ziren; **nekazari batzuek traktoreak zeharka jarri zituzten pneumatiko hustuekin**. Sei manifestari zauritu ziren eta gutxi batzuek harriren bat edo petardoren bat edo beste jaurti zuten, baina, hori kenduta, blokeo-saialdiak baketsuak eta antolatuak izan ziren. Medikuak eta abokatuak begira egon ziren, bai eta atzerriko polizien ordezkariak ere; izan ere, beren lagun aleman esperientziadunek jendea nola sakabanatu eta bidaltzen zuten ikasi nahi zuten. Azken gauean, hainbat manifestarik trenbideen gainean egin zuten lo kateaturik.[219] Ez bazuten geldiaraztea lortzen, asmoa zen **hondakinen garraioa ezinezko egitea atzerapenek eragindako gastu ekonomikoengatik**.

2008/11/20. **Goizeko seietan Garoñako zentralaren sarrera nagusian erresistentzia-kontainer bat jartzea lortu zuten**, Espainiako gobernuari

218 http://paulrios.nireblog.com/post/2008/11/11/valoracion-de-la-consulta-de-gernika

219 Rafael Poch, Lavanguardia.es webgunean. Berlinetik, 2008/11/11.

zentral nuklearrak ixteko hartu zuen konpromisoa bete eta zentral hori berehala itxi zezan eskatzeko. Greenpeaceko 60 kide ziren “Ni antinuklearra naiz” kanpainarekin. Kontainerraren barruan hamar bat aktibista zeuden gogor eusteko prest eta beren ekimena gizarteari helarazteko ordenagailu eramangarriak zituzten. Bien bitartean, beste aktibista batzuk zentral nuklearreko atera kateatu ziren, eta “Garoña itxi orain” zioten pankartak erakutsi zituzten. Burdin hesiaren barrualdetik presiopeko ura bota zieten, baina aktibistek gogor eutsi zioten eta gero eta komunikabide gehiago hurbildu ziren. Bertako biztanleek arropa lehorra, eltzekada bat dilista bero eta baserriko ogi egin berria eraman zizkieten, zentraleko segurtasun-kideek harriturik begiratzen zieten bitartean. Horrek protestari hamaika orduz eusten lagundu zien ekologistei, harik eta kamioi-garabi batek kontainerra ainguratuta zegoen lekutik askatzea lortu zuen arte. Horren ondoren, atxilotu egin zituzten eta Quintana Martín Galíndezeko kuartelera eraman zituzten. “Desobedientzia” leporatu zieten.[220]

2008/12/10. **Guraizeak gastu militarra mozteko.** Kakitzat taldeko hainbat kidek guraize erraldoi batzuk eraman zituzten Bilbora, Eusko Jaurlaritzako Industria Sailaren ordezkaritzara, gastu militarra moztu zezaten. “Erakundeek armamentu-enpresei ematen dizkieten diru-laguntzak” salatu nahi zituzten horrekin.

2008/12/17. AHT Gelditu! plataformak hausnarketa kolektibo bat eman zuen ezagutzera; ETAk abenduaren 3an Azpeitian Inazio Uria enpresariaren aurka egindako hilketa-atentatuarekin ados ez zegoela. Atentatuak AHTren obrekin lotura zuzena zuen. Plataformak berretsi zuen bere postulatuekin ahalik eta jende gehienak bat egitea nahi zuela baina **“soilik bide baketsuak erabiliz”**. “Jazarpen mediatikoa” eta “errepresio-bideak” desagerrarazteko ere eskatu zuen.

2008/12/18. **Maletekin Pertsona Migratzaileen Nazioarteko Egunean**. Eskubide-berdintasunaren aldeko pertsonen eta taldeen Zuzen sareak egunean zehar eskuan maleta bat edo bizkar-zorro bat eramateko deia egin zuen; maleta eta bizkar-zorroekin Andre Maria Zuriaren plazara joatea eskatu zuen, zehazki. “Emigratzaileak ez dira gure etsaiak, gure etsaia emigratzera behartzen dituen sistema da”. Espiritu horrexekin abenduaren 20an hainbat erakundek (besteak beste, Climade, ATTAC eta Giza Eskubideen Ligak) “**isiltasun-zirkulu” bat osatu zuten** Hendaiako Atxikitze Zentroaren parean, estatu frantseseko immigrazio-poliziaren aurka. Ordubetez isilik egon eta

220 Greenpeacen zuzeneko bloga: http://greenpeaceblong.wordpress.com/2008/11/20/blong-en-vivo-accion-de-greenpeace-en-garona/

gero, bakoitzak etxetik oparitako paperean bilduta eraman zituen opariekin mendixka bat egin zuten sinbolikoki zentroko atearen parean.

2008/12/18. **Erretiratu batzuek gaixotasun larriak zituzten presoekin aldatzeko proposatu zuten bere burua**. Sasoia Nafarroako pentsiodun eta erretiratuen elkarteak ezagutzera eman zuen Nicolas Sarkozy eta José Luis Rodríguez Zapatero presidenteei gutun bana bidali ziela. Gutun horietan bere burua eskaintzen zuten kartzelara joateko, gaixotasun larriak zituzten hamalau preso euskaldun aske uztearen truke. Adierazi zuten, bestalde, oraindik ez zutela erantzunik jaso, eta horregatik azaltzen ziotela jendeari zein ziren proposatutako trukaketaren helburuak. “Egin diegun eskaintza ez da haien justizian oinarritzen, baizik eta giza eskubide oinarrizkoenean. Helburua da gaixotasun larriak dituzten presoak behar bezala tratatuak izatea eta, maite dituztenez inguraturik, bizi duten egoerari aurre egin ahal izatea, bestela egoera itzulezina izan baitaiteke”. 50 bat erretiratuk berriz eskaini zuten bere burua trukaketarako Iruñeko kartzelaren parean 2009ko otsailaren 12an.

2008/12/23 eta 2008/12/24. **Olentzeroak arazoekin, eta ez meteorologikoak.** Nahiz eta urtero udalak eragozpen asko jarri Olentzeroekin zihoazen taldeek normaltasunez egiteko ibilbideak Iruñean, bereziki Arrosadia, Txantrea eta Donibane auzoetan, jende ugari bildu zen herri-ekintza horietan. Polizia mordoa joan zen, udaltzainak nahiz polizia espainola. Hainbat agentek argazkiak atera eta bideoak grabatu zizkieten Olentzeroekin zihoazen taldeei. Debekatu egin zieten errebindikaziozko eskaerak egitea; aurretik fidantzak ordaintzera behartu zituzten... eta zigorrak jarriko zizkietela mehatxu egin zieten urte hartan ere. Baina era guztietako debeku, mehatxu eta zailtasunak izan arren, ehunka pertsona atera ziren kalera Olentzero mitikoari laguntzeko. Auzoetako Koordinakundeak berriz ere adierazi zuen prest zegoela udalarduradunekin hitz egiteko eta Iruñeko “egoera aztertu eta denon artean festen funtzionamendu egokia bideratu ahal izateko mahai bat sortzeko”.

2008/12/26. **A zer jaiotza**. Komite Internazionalistak taldeko zenbait kidek parodia bat egin zuten Bilboko Arriaga antzokiaren parean. Parodian “Belengo estalpea” antzeztu zuten, kerubinekin, jaiotzarekin, erregeekin, ardiekin... hori guztia uniforme militarrez jantzita zeuden eta armak eta borrak zeramatzaten elementuek mehatxatzen zituztela. “Jaiotza”koek justizia, askatasuna eta **Israelgo produktuei boikota** egitea eskatzen zuten, Israel Gazako herri palestinarraren aurka eraso militarrak egiten ari baitzen une hartantxe.

2008/12/28. **Bidea urratzea itsasontziz, inposatutako zentsuraren aurrean**. Libano, Italia, Australia, Polonia, Britainia Handia, Kanada eta Espainiako giza eskubideen defendatzaileak **Gazan sartzea eta** arma-

da israeldarrak herritar palestinarren aurka eginiko **erasoen errealitatea dokumentatzea lortu zuten.** Aurreko lau hilabeteetan, Free Gaza (Gaza Askatu) mugimenduko itsasontziek bost aldiz lortu zuten Israelen setioa haustea. Aktibistek beren txosten eta lekukotasunak ezagutzera eman zituzten *FreeGaza.org* webgunean; "egun hauetan, bertsio ofizialak bakarrik daudenean, balio handia duen desobedientzia zibileko ekintza bat" izan zen.

2008/12/28. **500 pertsonak 12 pertsona epaitegietara eraman zituen gauza bera errepikatu zuten**. 12 gazte epaituak izan behar ziren Iruñeko Labrit aldapan eserialdi bat egiteagatik, haietako bi bidoi batzuetara kateaturik. Epaiketa horregatik protestatzeko manifestazio batean, 500 bat gaztek beren lagunek egin zutenaren antzeko eserialdi bat egin zuten leku berean. Aurrerago, manifestariek Euskal Jai gaztetxea egon zen lekuan pankarta bat jarri zuten, elkartasuna adierazteko leku hartan bertan pankarta bat jarri izanagatik urtarrilaren 8an epaiketa bat zuten hiru gazteri. Manifestazioaren aurrealdean zegoen pankartan hauxe jartzen zuen: "*Aukera bakarra, desobedientzia*". Kanpaina batek **eserialdi birtualak** egitera eta "**Nik ere egin nuen**" manifestua izenpetzera gonbidatzen zuen jendea.

2009/01/03. **Mundu are bidegabeago bat posible da!** San Arturo egunean Gerra eta Garapena Fundazioa Bilbon atera zen herritarrei gastu militarrari gehiago laguntzeko eskatzeko. Ongi uniformatuta eta haietako batzuk itsulapikoak eskuan zituztela, hauxe adierazi zuten:

> "Gure pertsonaia itzaltsuek izugarrizko ahalegina egin duten arren, 2008. urtean estatuak 25.066,87 milioi euro ziztrin, garai bateko 4 bilioi pezeta baino gehiago, erabili ditu gastu militarrerako. Armadak ezin du nahi lukeen beste bonbardatu eta goraka doan gure euskal industria militarrak ezin ditu hiltzeko horren eragingarriak diren armak saldu (*Eusko Kalitatea: zero akats!*). Gizartearen laguntza behar dugu! Krisi-garaian gaude eta agian erokeria irudituko zaizue gastu militarra handitzea, baina askoz hobe inbertituta dago euro bat ITP Turbo Propultsatzaileen Industriak borrokarako hegazkinak egin ditzan, edo tropak Afganistanera, Libanora edo Djibutira joan daitezen gerra egitera, osasungintzan, hezkuntzan edo kulturan baino! Ez egin zalantzarik! Sentitzen dugu gizarteko zenbait taldexkak duten jarrera ezkor eta ulertu ezin desatsegina, hala nola, hezitzaileek, osasungintzako langileek, immigranteek, langabeek edota sasi-bakezale hippyek. Taldexka horiek berez dira insolidarioak, ez dute ulertzen Defentsa Ministerioak, Gerra eta Garapena Fundazioak, Mugarik Gabeko Soldaduak GKEak, ITPk eta Bankuak batera hasi duten kausa horren handitasuna".[221]

221 http://www.antimilitaristas.org/spip.php?article4043

2009/01/05. **Giza ezkutuak**. Israelen armada Gaza erasotzen ari zen egun haietan, kooperante solidario batzuek, haien artean Alberto Arzek, giza ezkutuak osatu zituzten anbulantziak eta Palestinako beste hiritar-zentro batzuk babesteko, sionisten erasoak bizitzen ari baitziren. Hauxe izan zen adierazi zutena:

> "Zaurituak anbulantzietan jasotzen pasatzen dugu gaua, giza ezkutu lana egiten. Egoera beldurgarriak ikusten ditugu. Aurrekoan familia bereko hiru haur hil ziren gure aurrean. Mando batek zeraman gurdi batean iritsi ziren ospitalera. Neska txikia hilik iritsi zen. Beste biak handik gutxira hil ziren.[222] (...) Blokeoa hautsi daiteke. Okupazio-legeen legitimitatea ukatzeko prest egotea da behar dugun guztia".

2009/01/07. **Kamiseta solidarioa**. Kanouté futbolariak, Maliko nazionalitatea duen Sevillako aurrelariak, Gazako egoerari eskaini zion gola; izan ere, gola sartzean kamiseta altxatu zuen eta "Palestina" hitza hizkuntza askotan idatzita zuen elastiko bat erakutsi zuen. Bazekien horrek zigorra ekarriko ziola, baina bere ekintza solidarioa atera zioten txartel horiaren gainetik zegoen. Komunikabide idatzi batek titulu hauxe erabili zuen: "Bi gol Palestinarekin bihotzean".[223] Espainiako Federazioko Lehiaketa Batzordeak mezudun elastiko bat erakusteagatik jar zitekeen zigorrik handiena jarri zion: 3.000 euro. Batzordeko hiru kideetako batek boto partikular bat ere eman zuen eta hauxe adierazi zuen: "Palestina" besterik ez zioen elastiko hark indarkeria bultzatzen zuela uler zitekeela. Akusazio horrek aurrera egin izan balu, futbolariak 30.000 euroko zigorra jasoko zukeen. 2006an taldearen babeslearen irudia (apustu-etxe bat) zinta itsasgarriz estali zuen, haren erlijio-printzipioekin kontraesanean zegoelako.[224]

2009/01/12. Israel Gazan militarki sartu zenean, hainbat pertsonaren lekukotasunak ezagutu genituen, esaterako, protestak antolatzeagatik edota gerraren aurka azaltzeagatik atxilotu zituztenenak, edota palestinarren aurka edo Beiruten (Libanon) **borrokatzeari uko egin zioten[225] zenbait soldadurenak.** Horixe izan zen Itzik Shabbat sarjentuaren kasua; bere garaian ere

222 *El País* egunkaria, 2009/01/05.

223 *Gara* egunkaria, 2009/01/08.

224 *El País* egunkaria, 2009/01/10.

225 Yvke Mundial irrati-etxeko Patricia Rivasek Sergio Yahniri elkarrizketa egin zion. Informazio Alternatiboaren Zentroa (AIC) erakunde bakezalea zuzentzen zuen kazetari israeldarra zen Sergio Yahni. Galdera: Zein da Israelgo herritar baten patua gerrara joateko deitzen diotenean ezezkoa ematen badu, edo, zuen kasuan, etxeak botatzen saiatzen direnean tartean jartzen bada edo Israelgo indar militarrek giza eskubideen aurka egiten dituzten gehiegikeriak kameraz grabatzen baditu? Erantzuna: Hiru kasuetan Estatuak erantzun bera ematen du; kartzela. Ni neu atxilotua izan nintzen komunikabideen agentzia gisa lan egiteagatik, Israelek hilerri bat nola suntsitzen zuen grabatu nuelako. Gure lagun Abu Humus atxiloturik dago une honetan gerraren aurkako manifestazioak antolatzeagatik. Beste 700 preso daude gerrari aurka egiteagatik, jarduerak antolatu eta aurrera eramateagatik. Gure patua kartzela da. http://www.demagun.net/category/palestina/

adierazi zuen ez zuela parte hartuko Beiruten aurkako erasoan. “Erokeria honi aurre egiteko egiten dut, eta jendea kontura dadin guztiok ez gaudela gezurretan oinarritutako alferrikako gerra honen alde”. Shabbat 28 urteko gazte erreserbista bat zen; Sderoten bizi zen, Gazatik hurbil zegoen hiri batean. *Breaking the silence* (Isiltasuna hausten) GKEko kide batzuek ere hitz egin zuten, esaterako, Yehuda Shaulek, GKEaren sortzaileak Jerusalemen. *Breaking the silence* **soldaduei eskaintzen zitzaien leku** bat zen, sistematikoki egiten ziren **gehiegikeriak azaltzeko aukera izan zezaten**. 350ek baino gehiagok azaldu dituzte dagoeneko gehiegikeriak.

2009/01/17. **Desobedientzia zibileko ekintza baketsu bat egiten saiatu ziren manifestazio bat amaitzean AHTren lanen ondoan Urbinan**. Asmoa zen **lanen lekuan eserialdi bat egitea** “lurra berreskura zedin” eskatzeko. Baina ertzainek egurtu egin zituzten Urbina eta Erretana artean dagoen zelaigune batean esertzen hasi ziren lehenengo pertsonak. Lur-arraseko hegaldian zihoan helikoptero bat gehitu zitzaien Ertzaintzaren pilotakadei, eta, horren ondorioz, zauritu ugari egon ziren. Zortzi pertsona atxilotu zituzten. Hiru egunez inkomunikaturik eduki zituzten eta ia-ia Auzitegi Nazionalaren aurrera eraman zituzten.

2009/02/11. Greenpeace taldeko 60 aktibistak oihal berde erraldoiez estali zuten Almeriako Carboneras herrian dagoen El Algarrobito hondartzako makrohotela. Taldeko eskalatzaile batzuek 370 $m^2$-ko pankarta bat zintzilikatu zuten mezu honekin: “Parque natural sin hotel ilegal”. Bi zodiac-ek banderak zeramatzaten mezu berarekin. Aktibistek **18.000 $m^2$ oihal baino gehiago erabili zituzten 411 gela eta 20 solairu baino gehiago zituen hotela desagerrarazteko.** Hotela itsasertzetik 14 metro eskasera zegoen, Cabo de Gata-Níjar natura-parkearen erdi-erdian. Greenpeacek Espainiako Ingurumen Ministerioaren pasibotasuna salatu nahi zuen horrela.[226]

2009ko martxoa. **Elkartasuna zigortu nahi dute.** Atzerritarrak estatu frantsesean sartu eta bizitzen jartzea arautzen duen araudiko L622-1 artikuluak (bost urteko kartzela-zigorra eta 30.000 euro arteko isuna) eta Espainiako ministro-kontseiluak 2008ko abenduan onartu zuen Atzerritarren Legea erreformatzeko aurreproiektuaren 53. artikuluak mafiak balira bezala zigortzen dituzte “paperik gabeko” pertsonak etxean hartu edo haiei laguntzen dieten pertsonak. Hori dela-eta, hauxe salatu zuten apirilaren 8an Baionako epaitegiaren aurrean: “elkartasuna delitua bada, guztiok gara errudun”. Estatu espainolean **“Salba dezagun abegi ona”** sortu zen. **Sinadurak bildu zituzten** elkartasuna, oinarrizko balio bat, urratu ez zedin eskatzeko

226 Informazio gehiagorako: http://www.greenpeace.org/espana/news/greenpeace-hace-desaparecer

eta “irabazi-asmoa” gehitu zedin delitutzat hartzeko. Juan Goytisolok hauxe idatzi zuen: “herritar guztien eskubide besterenezina da lege bidegabe baten aurrean kontzientzia-eragozpena azaltzea”.[227]

> “Mezu bat bidaltzen dute eta jendeak barneratu egiten du; baina garrantzitsua da ez kikiltzea eta eremu askeen alde borroka egitea. Legea aldatzen bada **desobedientzia zibileko kanpaina bat planteatu beharko litzateke, herritarren ekimenetik sortua; agintariei desafioa egitea elkartasunaren sarea indartuz eta zabalduz”.**[228]

2009/03/01. “Pertsona bat, boto bat? Zergatik ez?”. Aurreko hauteskunde batzuetan egin zen moduan, Gasteizko kolektibo sozialek beren **botoa immigranteei eman zieten kolektibo horrek ere botoa emateko eskubidea zuela aldarrikatzeko.** Beren izena utzi zieten nahi zuten botoa aukeratu eta hautestontzian sar zezaten.

2009/03/13. **Trajez jantzitako** hiru pertsonak BBVAko akziodunen batzarrerako sarrerara iristea lortu zuten Bilbon eta, han, beren zorroak ireki eta **pintura gorria bota zuten burutik behera,** “bankuak diruagatik isurtzen duen odola” adierazteko. Ertzaintzak ahalegin guztiak egin zituen irudi hori ezabatzeko eta komunikabide gehienek ez zuten erakutsi. Ibaizabal Telebistako kameralari bat grabaketa ezabatzera behartu zuten. BBVAren aurkako plataformako kideei bilurrak jarri zizkieten eta lurretik arrastaka eraman zituzten. Horren ondorioz, kolore gorria zoladura osoan zabaldu zen.

> “Banku honen benetako irudia erakusten jarraitu nahi dugu –zioten aktibistek–. Eskura ditugun baliabide urriak erabiliko ditugu berriz ere, nahiz eta ezin diren alderatu BBVAk zazpi urte hauetan muntatu duen makineriarekin, arrakasta enpresariala eman dion makineriarekin. Joan den urtean ere ekintza erabili genuen gure eskarira arreta erakartzeko eta hala egiten jarraituko dugu”. [229]

2009/03/15. Donostiako biztanle ezagunek Garoña ixteko eskatu zuten. Eguzki taldearen ekimenez, **Raimundo Sarriegi, Pio Baroja eta Albert Einsteinek** “Garoña ez eskerrik asko” zioten **pegatina antinuklear zoragarriak izan zituzten papar-hegaletan jarririk** Donostian dituzten estatuetan.

2009/03/26. **Pantera Arrosaren estrategia.** Izen hori eman zioten Bartzelonan 10.000 manifestarik erabili zuten estrategiari. Manifestari haien asmoa zen “Bologna plana” zalantzan jartzea eta aste bat lehenago borrak

227 *El País* egunkaria, 2009/04/12, 25. or.

228 Daniel Izuzquiza, *paperik gabeko* lau pertsonarekin bizi den jesuita. “No nos van a acobardar”, *El País* egunkarian, 2009/03/10, 37. or.

229 www.bbvagh.org

baino liburuak nahiago zituzten ikasleek poliziarengandik jaso zuten erasoa salatzea. Izan ere, 141 pertsona zauritu zituzten erasoan. Istiluen kontrako polizia asko zeudenez, hirigunea poliziaz josirik zegoenez eta Barne Sailak manifestazioa "arrisku handikoa" izango zela eta Rambletatik ez zela igaroko adierazi zuenez, antolatzaileek ezustean manifestazioaren norabidea aldatzea eta errepresio-jokoan ez sartzea erabaki zuten. Hortaz, mobilizazioa Sants auzora bideratu zuten eta han elkartasunezko konplizitatez hartu zituzten. "Desertzio desobeditzaile bat da, aparta iruditzen zaidana", adierazi zuen manifestari batek, eta hauxe gehitu zuen: **"Armadunak armarik erabili ezinda utzi ditugu, eta oraindik ere gure bila ari dira. Ez ginen haien bataila-eremura azaldu. Horman marrazki bat egin eta haien *frame*tik ihes egin genuen gurea sortzeko".** Taktika berri honek –gehitu zuen– argi uzten du "Bologna eztabaida publiko bat bihurtu beharrean ordena publikoko gai bat bihurtu nahi zuen estrategia polizial baten irrigarritasuna". El País egunkariak berretsi zuen: "Gauza erraza da: panteraren moduan, ikasleak Clouseau inspektorearen (mossoen) presioa sentitu zuten eta ate bat marraztu zuten horman poliziaz inguraturik zeuden Ramblak uzteko eta Santsera joateko". Egunkariak onartu zuen gertatutakoak "ezustean harrapatu" zuela Polizia, eta "informazio-zerbitzuen aurreikuspen faltagatik nolabaiteko haserrea" azaldu zutela.[230] FAVB (*Federació d'Associacions de Veïns i Veïnes de Barcelona*) taldeko presidenteak, Eva Fernándezek, proposatu zuen pantera arrosaren eskuliburu bat argitaratu beharko litzatekeela mugimendu sozialetarako.

230 *El País* egunkaria. Edición Catalunya. Jesús Garcíaren kronika, 2009/03/28, 4. or.

# BILBOKO GOBERNU MILITARRA, ANTIMILITARISMOAREN JOMUGA

1980/03/16. **Atxiloketa mordoa.** Gazteak neurtzeko jarritako egunean, antimilitaristek **kontrapropaganda** banatu zuten, kontzientzia-eragozpenaren alde. Bilboko Urazurrutiako ikastetxean banatzen ari zirenean, Daniel González atxilotu zuten: armadari iraina egin izanaz akusatu zuten, eta Basauriko espetxean sartu. Bi egun geroago, KEM-MOCeko, Nuklearren Aurkako Komiteetako eta Indarkeria-eza Taldeko 19 kide **enkartelatu egin ziren Gobernu Militarraren aurrean, eta panfleto bera banatu zuten**. Poliziak atxilotu egin zituen, eta ez zituzten behin-behinean aske utzi hurrengo eguna arte. Egun horretan, antzeko ekintzak egin zituzten beste udalerri batzuetan. Daniel González askatzeko eskatzeko ekintzak hurrengo asteetan ere izan ziren. Epaileak, berriz, Gobernu Militarrean enkartelaturiko 19 pertsonak bilatzeko eta atxilotzeko agindua eman zuen. Apirilaren 18an, Santi Sade atxilotu zuten, lantokian. Maiatzaren 5ean, Bilboko Espainiako Plazan manifestazio publikoa egingo zutela adierazi zuten, baina ez zituzten atxilotu. Hurrengo egunean, **enkartelatuta agertu ziren** Gobernu Militarraren aurrean. Ilaran aurrera egiten hasi ziren eta polizia militarrek gelditzeko agindua eman zieten. Ez ziren gelditu eta poliziek tiro-segida batzuk bota zituzten airera metrailadorez. **Antimilitaristak une batez gelditu ziren, baina gero, polizienganaino iritsi arte jarraitu zuten.** Nor ziren esan zuten eta, orduan bai, atxilotu egin zituzten. Emakumeak Langraizko espetxera eraman zituzten, eta gizonezkoak, berriz, Basaurikora. Elkartasun-ekintzak izan ziren beste leku batzuetan, bata bestearen atzetik. Beste laurogeita hamar lagun atxilotu zituzten. Maiatzaren 17an, indarkeria handiz erreprimitu zuten Basauriko espetxearen aurrean eginiko kontzentrazioa. 25ean, atxilotutako taldeak gose-greba hasi zuen, eta horietako batzuek egarri-greba ere bai. Basurtoko eta Gasteizko ospitaletan amaitu zuten denek. 20 egun egoera horretan eman eta gero, ekainaren 14an, aske uzteko agindua iritsi zen Burgosko Komandantzia Nagusitik. Auzia amaitutzat jo zuten.[231]

1985/10/19. "**Txistualdia-txisaldia**" Bilboko Gobernu Militarraren aurrean. Polizia militarrek beren armak hots handiz kargatu zituzten, baina hortxe geratu zen dena.

1994/05/11. KEM-MOCeko intsumisoek "Intsumisioa" hitza margotu zuten Gobernu Militarreko paretetan. Ertzaintza intsumisoak atxilotzera joan zenean, haiek **kuboetan zuten pintura burutik behera bota zuten**, eta atxiloketa eragotzi.

1994/08/05. Bi intsumisok, hirugarren gradua urratu eta gero, Bilboko Gobernu Militarrera joan ziren eta **zementu-balde batzuetan sartuta immobilizatu ziren**.

1995/02/20. **Gobernu Militarreko hormak "botatzen" saiatu ziren**, pikotxak eta mailuak erabiliz. Ez zuten lortu; beraz, **hamalau urte geroago**, 2009ko otsailaren 14an, bost antimilitaristak, kaskoz eta buzo horiz jantzita, eta pikotxak eta mazoak erabiliz, **eraikinaren hormak kolpatu zituzten**, eraikina "botatzeko asmo onez, armada erabat abolitzeko ekintza izan dadin". Ertzain-talde batek KEM-MOCeko kideak identifikatu zituen eta eraisteko erre-

231 Data horietako *Egin* egunkaria eta Ramón Carratalá ren "En legítima desobediencia", op. cit, 90. or. Kanpaina horretan, berrehun lagun inguru atxilotu zituzten.

mintak kendu zien. Bitartean, antimilitaristek, patxada handiz, atseden hartzen egon ziren, ogitarteko bat jaten eta ardoa zahatotik edaten.

1995/05/12. Intsumisoek **kolore arrosaz margotu zituzten** Bizkaiko Gobernu Militarreko hormak.

1996/01/30. **Gandhi** eta haren alderdikide antimilitarista batzuk Gobernu Militarreko garitara **igo ziren**. Soinean, durbantea eta tunika baino ez. Guardia egiten ari ziren soldaduak ez ziren gai izan indarkeria-ezaren jarraitzaileak joanarazteko.

1996/05/23. KEM-MOCeko kide batzuk, **liztorrez mozorrotuta,** Gobernu Militarrean zeuden **militarren uniformeak ziztatu zituzten**.

1996/12/28. **Inuxente Eguna.** Dozena erdi bat antimilitarista, Inuxente Eguneko txorimaloz mozorrotuta, Gobernu Militarreko patioan sartu ziren. "Militarrak barregarri uzteko asmo nabarmenaz" sartu zirela argitaratu zuen *El Mundo* egunkariak hurrengo egunean. Horrela jarraitzen zuen albisteak:

> "Gazte batzuk, metalezko bi eskailera zeramatzatela, furgoneta batetik irten eta garitarantz joan ziren korrika. Lastertasun eta zehaztasun harrigarriaz, bost mutil eta neska bat eskaileratik igo ziren, beste lagun antimilitarista batzuek heltzen zioten bitartean. Gora iritsi eta gero, garita zeharkatu zuten eta kuarteleko patiora sartu ziren. KEM-MOCeko sei kideek kasko militarren itxurako zerbait zeramaten buruan eta buzo horiz jantzita zeuden, inozentadetako txorimaloak balira bezala. Horietako batek txintxeta handi baten itxurako tramankulu bat zeraman gorputzean. Beste batek kateorratz erraldoi baten antzeko zerbait zeraman. Garitatik barneko patiora jaitsi eta gero, biak berehala hasi ziren korrika eta jirabiraka, besoak eta zangoak zabalduta –inozentadetako panpina imitatzen–, eta "Inocente, inocente" telesaileko sintonia abesten. Beren burua guardia egiten ari ziren soldaduen bizkarrean itsasteko helburua zuten; hori zen inozentada. Soldaduak, berriz, zur eta lur, patio batean jirabiraka dabiltzan txitak antzeratu nahi zuten gazte horiek harrapatzen saiatu ziren. Bitartean, beste bi gaztek pankarta bat zabaldu zuten, "Desobeditzen" leloa zeramana. Beste bi lagun kuarteleko zabalgunean dauden kanoietako batera kateatzen saiatu ziren. Azken horiek, patiora jaitsi aurretik, panpina handi bat zintzilik jarri zuten garitaren kanpoko aldean: "Bixente, el desobediente". Geroxeago, guardia egiten ari ziren soldaduek (...) gazteak mendean hartzea lortu zuten, hauek aurre egin gabe. Seiak harrapatu eta lurrean etzan eta gero, bilurrak jarri zizkieten. Gazteak, bitartean, etengabe egon ziren oilaloken antzera kakara egiten eta iseka egiten".[232]

1998/12/27. **Bake-hitzarmen sinbolikoa antimilitaristen eta Espainiako armadaren artean.** Gobernu Militarraren aurrean, militarren eta intsumisoen arteko gezurrezko "bake-hitzarmen" baten sinaduraren parodia antzeztu zuen KEM-MOCek. Hitzarmen horretan, KEM-MOCek aitortu zuen armadaren "grina zibilizatzaileentzako oztopoa" izan zela, eta, halaber, onartu zuen Indar Armatuen aurkako beren borroka "ordena publikoa eta legezkotasuna errespetatu nahi duen orok onartu ezineko desobedientzia bihurtu zela".

2001/03/21. **Eraikin militarra hormatu egin zuten.** Buzo urdinez eta obretako kaskoz jantzita, Kakitzateko zortzi kide, *"Derribos antimilitaristas Ejerzitorik ez!"* enpresakoak, adreiluzko horma bat eraikitzen hasi ziren Gobernu Militarreko sarrera nagusian. Eraikineko

232 *El Mundo* egunkaria, 1996ko abenduak 29.

horman, pankarta bat jarri zuten, "Cerrado por cese. Intsumisioa" zioena. Ertzaintza iritsi zenerako, obra jada amaitua zuten, eta ogitartekoa jaten eta ardoa zahatotik edaten ari ziren.

2001/06/28. **Bikingoak iritsi ziren.** Ander Eiguren Bilbon epaitu zuten, "**armak nabarmen erakutsi izanaz** eta hirugarren batzuei kalteak eragin ahal izanaz" akusatuta. Gertakariak 1999ko martxokoak ziren: Eigurenek  protesta-ekintza batean parte hartu zuen, **bikingoz mozorrotuta eta borra bat zeramala**. Hori zen "arma". Eigurenen esanetan, "oso aitzakia xelebrea zen hori, egun horretan bertan hasi baitziren bonbardaketak Kosovon".

2002/02/02. **Birziklapena.** Gobernu Militarraren aurrean, birziklapenerako **birringailu erraldoi** bat jarri zuten (*Birziklagailu antimilitarista*), kolore horikoa. Makina horrek **armadaren erreserbara pasatzeko agiriak konfeti bihurtzen zituen**. Papertxo horiek haizatu bitartean, ardo on batekin topa egiten ibili ziren ekintzako parte-hartzaileak. KEM-MOCek antolatu zuen ekintza hori.

2002/02/12. **Sua. Gobernu Militarraren aurrean,** zenbait intsumisori **erreserbara pasatzen zirela jakinarazteko bidalitako agiriak erre zituzten**. Pankarta batean, "Ni indulto, ni profesionalización. Ejército abolición" leloa. Kakitzatek antolatu zuen ekintza hori.

2002/06/01. **Spidermanek Gobernu Militarreko garitara eskalatu zuen.** Bost antimilitaristak kuarteleko burdin hesia ireki zuten eta barneko garitetako batera igo ziren. Soldadu-talde urriak ezin izan zien aurre egin. Soldaduen erreakzio-gaitasun kaxkarra ikusita, beste antimilitarista bat, Spiderman desobeditzaileaz jantzita, hormatik kanpoko garitetako batera igo zen.

2002/12/28. **Inozentada.** "Enpresaburu gazteen" bozeramaile bat Gobernu Militarraren aurrean diru-bilketako mahai bat jarri zuen. Mahaian Eusko Jaurlaritzaren armarria, jostailuzko hegazkin bat eta euroz betetako poltsa handi bat zeuden. Bozeramailea mahaiaren ondoan eseri zen, trajez ondo jantzita, txapela zeramala eta albo bietan burezur eta sega bana zituela, eta, handik, "armei buruzko euskal labela" eratzea proposatu zuen, ozen. Inozenteen Eguna zen. Txiripa hutsa. Dena dela, "gastu militarrak inozentada galanta" direla esan zuen, eta gastu horiei esker euskal enpresek 600 milioi euro irabazi zituztela 2002an. Gainera, enpresa horiek Eusko Jaurlaritzaren laguntzak jasotzen zituztela esan zuen, eta zientzia-baliabideen % 67 desbideratzen zela ikerkuntza militarrera. Gastu Militarren Aurkako Plataformak antolatu zuen parodia.

2003/04/13. **Mendebaldeko zibilizazioaren izenean.** Espainiak Irakeko inbasioan parte hartu izanaren kontra protestatzeko, hiru gazte antimilitaristak, buzo zuriz jantzita, Gobernu Militarreko fatxada nabarmen pintatzen jardun zuten. Aldi berean, hogeita hamar lagun eraikinaren burdin hesietara igo ziren eta gerraren kontrako kartelak eta pankartak jarri zituzten. Gero, beste hiru lagun azaldu ziren, trajez jantzita. "Askatasuna dakarten humanistak" zirela zioten, bai eta "zuriei esker" dagoela "zibilizazioa" ere, eta aurretik iritsitakoei aurre egiten hasi zitzaien. Parodia bat zen, baina Ertzaintza etorri eta akabo txantxak. 2003ko urrian, ekintza horretako hiru parte-hartzaileren kontrako epaiketa izan zen. Gobernu Militarra zikindu izanaz akusatu zituzten, baina ez-errudun deklaratu zituzten.

2006/06/17. **Huts egindako futbol-partida antimilitaristen eta armadaren artean.** Alemaniako 2006ko Munduko Futbol Txapelketa zela-eta, KEM-MOCeko hogeita hamar bat antimilitaristak armadaren aurkako protesta-ekintza antolatu zuten. Helburua zen Gobernu Militarrean sartzea, haietako hamaikak, futbolariz jantzita, "armadaren kontra partida bat jokatzeko". Baina ez zen partidarik izan, eta gainera, Polizia Militarrak zortzi atxilotu zituen gobernuaren barruan, eta Guardia Zibilaren esku utzi zituen, "establezimendu militarra bortxatu" izanaz akusatuta.

2007/02/17. **Inauteri-ekintza: Desarmari, Desertaithor eta Superbixente Desobediente.** Gaizkiaren armadari laguntzera joan zen supergaizto-talde bat, soldadu profesionalen faltagatik krisi larrian zegoelako. Nondik joan, hura hondatzen duen tanke baten atzetik, *Senerman*, *Miliktus* eta *Doctor Destrucción* Gobernu Militarrera iritsi ziren. Aldi berean, ehunka paraxutista (plastikozko 300 panpina bota zituzten Gobernu barrura) instalazio militarrean lurreratu ziren, “Evitemos que desaparezca el Ejército” misioaren baitan. Baina *Rocky* filmaren musika hondoan entzuten dela, hor ageri ziren hiru superheroiak fuksia eta hori koloreko jantziz mozorrotuta: *Desertaithorrek, Superbixente desobedientek* eta *Desarmari emakume bionikoak* tanke suntsitzailearen kanoia hondatu zuten, bai eta supergaiztoak geldiarazi ere, konfetia eta inauteri-musika erabiliz. *Superbixente Desobediente*k adierazi zuen superheroi antimilitaristek munduko bakearen alde egiten jarraituko zutela mundu osoko supergaiztoak, gaizkiaren armadak eta gerrak desagerrarazi arte.[233]

2008/02/02. **Joplin eta Dylan Bilbon, hippyen artean.** Antimilitaristen talde batek, hippyz jantzita, inauteriak ospatu zituen Gobernu Militarra lorategiz mozorrotuz. Horretarako, sarrerako burdin hesia lorez bete zuten, armadarik gabeko gizartea zein loretsu eta positiboa izango zen antzeratzeko. Pankartak hartuta –“Make Love Not War”, “Stop the War”, “Ejerzitoak Apurtu” eta “Guerra p’a este cuerpo y Paz p’al mundo entero” leloak, besteak beste–, kasko erraldoi baten inguruan manifestatu ziren. Kaskotik irteten, pertsona bat lorez jantzita zegoen, kontzientzia-eragozpena adieraziz. Bertaratutakoen artean, Janis Joplin eta Bob Dylan, gitarra eta guzti. Honela azaldu zuen KEM-MOCek ekintza hori: “Gerrak ezinbestekoak ez direla gogorarazi nahi dugu, eta gaurko mozorroa errealitate bihurtu dadin, deia egin nahi dugu, zentzutasunez jokatzeko, ez obeditzeko eskatu nahi dugu, bai eta gure armak erabiltzeko ere armadaren abolizioa lortzeko: indarkeria-eza, irudimena eta zentzua. Eta noski, amodioa egitea, eta ez gerra!”. Ertzaintzak lorezain hippy bat identifikatu zuen. Epaitu egin zuten:

2008/04/03. “**Oso polita geratu zen”.** Sara Lopategi Escudero Bilboko Auzitegiko Judizio Aretoan epaitu zuten, Bizkaiko hiriburuko Gobernu Militarreko “fatxada itsustu” izanaz akusatuta. Absolbitu egin zuten. Hona hemen ahozko judizioan esandakoen zati bat:[234]

> **Letradua**: Zer-nolako lotura duzu salatu diren gertaerekin?
>
> **Sara**: Bilboko KEM-MOC talde antimilitaristako kide naiz. Beraz, parte-hartze aktiboa izaten dut armaden jarduna gizartean salatzeko eta indarkeriarik eta armadarik gabeko gizartea sustatzeko egiten diren bileretan, salatze-ekintzetan, informazio-ekintzetan, zerga-eragozpeneko kanpainetan eta abarrean. Inauterietako egun horretan, taldekoekin joan nintzen, inauteriak Bilboko Kuartel Militarraren aurrean ospatzera, bertan aldarrikatzeko armadaren abolizioa eta erakunde horrek erabilitako eremua gizarteak erabiltzea. Horretarako, modu sinboliko eta pozgarri bat aukeratu genuen: atea koloretako lorez mozorrotzea.
>
> **Letradua**: Nolakoak ziren zuek jarritako loreak?
>
> **Sara**: Oso politak. Kartoi mehezko lore handiak ziren, zenbait koloretakoak, eta Juan de Garay kaleko atean jarri genituen, karrozari-zinta marroiaren bidez lotuta. Oso polita geratu zen atea.
>
> **Letradua**: Zer-nolako parte-hartzea izan zenuen gertaeretan? Atean lorerik jarri al zenuen?

233 http://www.antimilitaristas.org/article.php3?id_article=3119

234 http://www.eitb24.com/portal/eitb24/noticia/es/sociedad/acto-antimilitarista-en-bilbao-detenidas-8-personas-al-entrar-en-?itemId=D37874&cl=%2Feitb24%2Fsociedad&idioma=es

**Sara**: Nik ez. Baina oso gustura egingo nuen. Poliziarekin hitz egiteaz arduratu nintzen, azaltzeko indarkeriarik gabeko festa zela eta inauteriak ospatzen ari ginela; armadakoak konbentzitu nahi genituela, amodioa egin zezaten, eta ez gerra, eta eremu hori helburu hobe batzuetarako erabiltzea aldarrikatu nahi genuela.

**Letradua**: Gertaera horiek direla-eta fatxada itsustu duzula leporatzen dizute. Egia al da hori?

**Sara:** Ez! Gure helburua ez zen fatxada itsustea, baizik eta guztiz kontrakoa. Poz eta kolore apur bat eraman nahi genuen erakunde ilun hori dagoen lekura, erakunde horrek berez sortzen baitu beldurra, mesfidantza eta indarkeria. Lorategi bat jartzea zen helburua.

**Letradua**: Beste zerbait esan nahi al duzu?

**Sara**: Bai. Gizarte osoa konbentzitu nahi nuke, amodioa egin dezaten eta ez gerra! *Make love no war!* Zentzuz jokatzeko deia egin nahi dut, eta militar guztiak armadari eta armei intsumisioa egitera animatu. Lore guztiak moztuta ere, ezinezkoa da udaberria geldiaraztea.

## 2. ERANSKINA

## GIZARTE-KRITIKARAKO EREMUAK BARAKALDON ETA BILBON

Eranskin honetan, Ezkerraldeko zenbait gizarte-kolektiboren ekimenak jaso dira, beren berezitasuna eta irmotasunagatik. Hona hemen talde horietako batzuk: Barakaldoko eta Sestaoko langabetuen asanbladak; Berri Otxoak (Barakaldo); Mailuketa-Elkartzen (Sestao); SOS Ezkerraldea; AHTren Aurkako Asanblada; La Kelo Gaztetxea (Santurtzi); Barakaldoko Gazte Asanblada; Argitan (Barakaldo) eta Neba-Neba (Sestao) Emakumeentzako Aholku Etxeak; Kakitzat...

2001/04/11. **"Gurutze-bidea", gerripeko hutsez jantzita eta hiru gurutze handi eramaten.** Gizarte-bazterkeriaren aurka jarduten duten kolektibo batzuek egin zuten Bilbon, Bizkaiko Foru Aldundiaren eta BBVA bankuaren egoitzen artean, 25 urtetik beherako gazteei oinarrizko errenta ukatu izana salatzeko. "Megabankura" iristean, **"gurutziltzaketa"** egin zen. BBVAko bankari bat eta Eusko Jaurlaritzako eta aldi baterako laneko enpresen ordezkari bana hartu zuten parte. Bide osoan, *gurutziltzatuak* hitzez akuilatu zituzten: "Gogorrago egin behar duzue lan. Beti alferkerietan zabiltzate. Ez dago eskubiderik, nola irabaziko dugu, bada, diru gehiago, ordu estrarik sartzen ez baduzue eta sakrifiziorik egiten ez baduzue?" "Gurutziltzaketaren" ondoren, *bankariak* aldarrikapen bat irakurri zuen: "Beste behin irabazi egin dugu. Lan egin dezatela. Gurutziltzatuak izateko eskubidea baino ez dute".

2001/06/27. **Astronautez mozorrotuta,** pobreziaren aurkako laguntza publikoen bi hartzaile ordu erdi egon ziren kateatuta Bizkaiko Batzar Nagusien egoitzaren burdin hesian, ertzain batzuek kateak moztu arte. Kartel batzuk zituzten, "2001, una odisea en la asistencia social" eta "En lugar de caridad, justicia social" ziotenak.

2002/01/08. **Pirata-talde batek kutxa bat** entregatu zuen BSCH bankuko Bilboko sukurtsal batean. Kutxan, 360,61 euro, **1 eta 2 zentimoko txanponetan**, Eusko Jaurlaritzak Zordunok-Red Ciudadana de Abolición de la Deuda Externa elkarteari Burtsan protesta-ekintza bat egiteagatik jarritako isuna ordaintzeko. "Itsas zabaletik gatoz pirata-etxe honetara, eginkizun bakarra betetzera: Botina entregatzera", zioten, erakunde horretako presidenteari erreferentzia eginez.

2002/04/24. Barakaldon, **Gizarte Ongizatearen "hondoratzea" antzeztu zuten**, eta gizarte-laguntzen murrizketak salatu. Bela bateko itsasontzi bat, "Naufragio en Bienestar Social" leloa zeramana, Barakaldo Antzokitik abiatu zen eta Udaletxearen aurrera iritsi zen. Han, ate aurrean, hiru naufrago erori ziren, akituta. Honela zioen Berri-otxoak elkartearen pankartak: "Contra la exclusión social, vivir dignamente es nuestro derecho".

2002/10/03. **Toreatzailez jantzita, kapote eta guzti.** "Bienestar Social nos torea" leloa aukeratu zuten Harresiak Apurtuz etorkinen laguntzarako koordinadorak, SOS Arrazakeriak eta gizarte-bazterkeriaren aurkako beste plataforma batzuek, Bizkaiko Foru Aldundiaren aurrean protesta egiteko, gizarteratzeko laguntzetarako aurrekontu-saila apirilerako agortu izana salatuz.

2002/10/24. **Soinean upeltxo batzuk baino ez.** Horrela ibili ziren sei pertsona Barakaldoko kaleen barrena, luxuzko 92 etxebizitzaren eraikuntzak (420.708 euroko prezioa zuten) "abia-

tutako espekulazio-prozesua” salatzeko. Karteletan, besteak beste, lelo hauek irakur zitekeen: “Etxebizitza duina orain”, “Espekulaziorik ez”, “Casas para tod@s”...

2003/11/04. **Barakaldo CFeko jokalariez eta guardia zibilez jantzita.** Barakaldoko Desmilitarizazioaren aldeko Plataformako hogei lagun inguruk protestatu egin zuten Barakaldoko Lasesarre auzoko aisialdi-eremu batean Guardia Zibileko kuartela eraiki izanagatik. Ekintza horren bidez, leku horri emandako erabilera berriari buruzko parodia egin nahi zuten.

2004/11/18. **Jendea lurrean etzanda, jantziak tiroz zulatuta zituztela,** odola, gurutzeak, hilkutxa bat eta arma-lantegien izenak. “Euskal Herrian ekoizten dira, Eusko Jaurlaritzak diru-laguntzak ematen dizkie eta Irakeko herriak, besteak beste, pairatzen ditu”, salatu zuen Kakitzatek.

2004/12/10. **Sukaldari klasikoak eta usadio berrikoak.** Kakitzateko kideek, “**Ni armas, ni bombas. Mejor bombones**” leloa zeramaten kartelak zituztela, kanpo-zorra barkatzeko eskatzen zuen legegintzako herri-ekimenaren alde egin zuten Eusko Jaurlaritzaren Bilboko egoitzaren aurrean.

2005/06/08. **Bainujantziak, igerilekurako txanoak, uretako betaurrekoak eta flotagailuak soinean.** Horrela jantzita sartu ziren Barakaldoko Zaballa Plazako iturriko uretan, “Mójate contra el gasto militar” lelopeko kontzentrazio batean. Langabeziaren eta pobreziaren aurkako X. martxaren berri ematen ari ziren.

2007/02/14. **Biluzik.** “El Gobierno Vasco nos deja en pelotas”, “Cada mes que pasa, esto va peor”, “Así nos deja el Gobierno Vasco”... Zortzi pertsonak larrugorrian joan ziren Eusko Jaurlaritzaren Bilboko delegaziotik Bizkaiko Foru Aldundiaren egoitzaraino, gizarte-gastuetarako aurrekontuen eta gizarte-larrialdietarako laguntzen murrizketa salatzeko.

2007/06/05. **Caponata, Turulata oiloak eta haien lagunak, txitak besapean zeramatzatela,** “Por nuestro Derecho a un Nido Digno” lelopean, Sestaoko udaletxearen aurrean kontzentratu ziren, gastu militarrak eta Ezkerraldean izaten diren espekulazio-egoerak salatzeko, eta etxebizitzarako eskubidea aldarrikatzeko. Hegaztiek agiri bat entregatu zuten Sestaoko Udaleko erregistroan. Agiri horren bidez hauek eskatzen zituzten: batetik, Rivas, Urbinaga eta Simóndrogas auzoetarako aurreikusitako berroneratze-planek eragindako ondorioak zirela-eta, erakunde-politiketan lehentasuna emateko auzo horietako bizilagun guztien gizarte-eskubideak errespetatzeari, eta, bestetik, etxebizitza eta gizarte-prestazio duinak izateko aukera.

2008/12/22. **Olentzero garaiz baino lehenago iritsi zen herrira eta erratz bana eman zien** alkateari eta Gizarte Ekintzako zinegotziari, “zerbitzu publikoetatik azpikontratazioa eta enplegu-kolokatasuna hobeto ekortzeko”. Olentzero dotoreak zeraman erratzetan, “barriendo crisis” leloa zegoen.

2009/02/04**. Etxebizitzaz mozorrotuta.** Iurbentia Promoción Inmobiliaria enpresaren egoitzaren aurrean, Barakaldoko elkarte batzuek zenbait elkartasun-ekintzaren berri eman zuten, Lutxanako Sefanitro eta Rontealde enpresenak izandako lursailetan gertaturiko “hirigintza-pelotazoagatik” kaltetutakoen alde.

# UDALERRIETATIK

Liburua amaitzeko, beste kronologia bat, hasieran bezala. Hemengo hau, ordea, ehunka urtez geroago hasten da, eta bertan, gizarte-espazioaren okupazio militarraren gaitzespenaren berri ematen da. Zerrendan ageri diren udalerri horiez gain, NATOren aurkako mozioak onartu zituztenak, batez ere 1986an, gehitu beharko lirateke.

## 3.1. Herrietan nahiz Euskal Herri osoan armadak maniobrak egitearen aurkako udalen edota bestelako erakundeen jarrera

- **Tutera, Arguedas, Valtierra, Cadreita eta Cascanteko alkateak.** 1979ko maiatzaren 19an, Bardeetako tiro-poligonoa desagerrarazteko eskatu zuten, bai eta lur horiek nekazaritza-aprobetxamenduetarako erabiltzeko ere.
- **Agoizko Udala.** 1979ko maiatzaren 24an, Bardeetako tiro-poligonoaren aurka jartzea erabaki zuten.
- **Urnietako Udala.** 1979ko maiatzaren 25ean, Bardeetako tiro-poligonoaren aurka jarritako Erriberako udalekiko babesa adierazi zuen.
- **Tuterako Udala.** 1979ko ekainaren 4an, aurreko egunean hartutako erabakia berretsi zuen; hau da, tiro-poligonoa desegiteko eskatzea.
- **Zizur, Antsoain, Lizarra, Goizueta, Olazti, Altsasu, Iturmendi, Bakaiku, Etxarri-Aranatz, Arbizu, Lakuntza eta Ergoienako udalak.** 1979ko ekainaren 5ean, Barne Arazoetako ministroaren eta gobernadore zibilaren dimisioa eskatu zuten, Guardia Zibilak Gladys del Estal hiltzeagatik. Halaber, honako hauek eskatu zituzten: erantzukizun penalak zehazteko, gertaerak argitzeko, Ordena Publikoko Indarrak Euskaditik joateko, errepresio-gorputzak desegiteko, eta Bardeetako tiro-poligono Nafarroari itzultzeko.
- **Nafarroako Parlamentua.** 1980an, tiro-poligonoaren aurkako mozioa onartu zuten. Gero, Gabriel Urralburu presidenteak mozioa jakinarazi zion Narcís Serra Defentsa ministroari.
- **Irunberriko Udala.** Udalaren osoko bilkuran, Bardeetako tiro-poligonoari buruzko erreferenduma egiteko deialdia onartu zuten, baina gobernadore zibilak debekatu egin zuen.
- **Nafarroako 33 udal.** 1981eko martxoaren 11n, Nafarroako 33 udal Bardeetako tiro-poligonoaren aurkako jarrera adierazi zuten.
- **Lesakako Udala.** 1981eko maiatzaren 5ean, inguruan soldaduak zeudenez, horren kontrako mozioa onartu zuten.
- **Izabako Udala.** 1981eko ekainaren 5ean, Belaguako kuartel militarrerako obrak bertan behera uzteko agintzea erabaki zuen, udal-lizentzia eskatu ez zutelako. 17an, Nafarroako gobernadore zibilak erabaki hori baliogabetu zuen, horrelako erabakiak defentsa nazionalari baino ez zegozkiola argudiatuz, baina udalak Lurralde Auzitegira jo zuen uztailaren 30ean.

- **Etxarriko Udala.** Belaguako kuartel militarraren aurkako mozioa, 1981eko uztailaren 16an.
- **Aurizberriko Kontzejua.** 1981eko irailaren 5ean, militarrak alde egiteko eskatu zuten.
- **Donostiako Udala.** Mozio bat onartu zuten, “atzerriko edozein armada Euskadin egotearen kontra”, baina Gipuzkoako Gobernu Zibilak baliogabetu egin zuen 1981eko abenduaren 4an.
- **Pasaiako Udala.** 1983ko apirilaren 12an, Koordinadora Ekologistaren mozio bat onartu zuten, Espainiako armada Jaizkibelen egotearen aurka.
- **Lezoko Udala.** 1983ko apirilaren 19an, militarrek Jaizkibel menditik alde egiteko eskatu zuen, bai eta lursailak erabilera militarretarako ez desjabetzeko ere. Halaber, batzorde bat sortu zuten, Gobernu Militarrarekin negoziatzeko, armada mendi horretan ibili ez zedin.
- **Olaztiko Udala.** 1985eko abenduaren 12an hartutako erabakian, adierazi zuten egokiagoa zela “Urbasa, Andia eta Lokiz mendilerroak parke natural” izatea, “maniobra militarretan erabiltzea baino”.
- **Aguraingo Udala.** 1985eko maiatzaren 22an, agintari militarrei protesta-idazki bat bidaltzea erabaki zuten, armadak eginiko maniobretan “zelaiak eta belardiak hondatzeagatik, bertako larreak Entziako eta Iturrietako partzuergoetako abeltzainak erabiltzen baitituzte”. Ekainean, María Luisa Murguiondo alkate andreak beste gutun bat bidali zion Arabako gobernadore militarrari, Aguraingo udalerrian berriz maniobra militarrak egiten ari izanaz protestatzeko. Hain zuzen, ehun soldadu inguru zebiltzan Entziako mendilerroan.
- **Gasteizko Udala.** Udalak 1985eko urriaren 2an adierazitako balorazioaren arabera, Espainiako armadaren guda-gurdiek 4 milioi pezetako kalteak eragin zituen hiria zeharkatzean. Txostena Arabako gobernadore militarrari bidali zioten, “horrelakorik berriz ez gertatzeko hartu beharreko neurriak har ditzan”.
- **Tuterako Udala.** 1986ko urtarrilean, berriro eskatu zuen Bardeetako tiro-poligonoa desegiteko, “hainbatetan eskatua”.
- **Antsoaingo Kontzejua.** 1986ko otsailaren 28an, tiro-poligonoa desegiteko eskatu zuen.
- **Urretxuko Udala.** 1986ko martxoan, bakearen eta desarmearen aldeko manifestuaren eta taldeen eskaerak onartu zituen: NATOri ez, Bardeetako tiro-poligonoa desegitea, udalerria eremu ez-nuklearra deklaratzea...
- **Leríngo Udala.** 1986ko martxoaren 7an, Bardeetako tiro-poligonoa desegitearen aldeko mozioa onartu zuten, eta aliantza atlantikotik ateratzeko eskatu.
- **Arroizko Udala.** 1986ko martxoaren 7an, NATOtik irtetearen aldeko eta Bardeetako tiro-poligonoa desegitearen aldeko mozioa onartu zuen.
- **Zaratamoko Udala.** 1986ko martxoaren 8an, NATOn sartzeak zekarren militarizazioaren, armamentismoaren eta euskal subiranotasunarentzako mehatxuaren kontrako mozioa onartu zuen. Halaber, udalerria eremu ez-nuklearra deklaratu zuen, bai eta NATOri buruzko erreferendumean ezezkoa emateko eskatu ere.
- **Azkoien-Peraltako Udala.** 1987ko abuztuaren 25ean, tiro-poligonoa desegiteko eskatzea erabaki zuen.
- **Tuterako Udala.** 1987ko azaroaren 28an, tiro-poligonoa desegitearen aldeko jarrera adierazi zuen, aho batez.
- **Allo, Andosilla, Atarrabia, Berbintzana, Erriberri, Etxauri, Ezkabarte, Gares, Iturmendi, Kortes, Larraga, Larraun, Lesaka, Mendigorria, Olazti, Oteitza, Puiu,**

**Tafalla, Uxue, Uterga, Zirauki, Zizur Nagusiko udalak eta Orkoiengo Kontzejua.** 1987ko azarotik 1988ko maiatzera bitartean, Bardeetako tiro-poligonoa desegitearen eta herri-lurrak berreskuratzearen aldeko mozioak onartu zituzten, bai eta beren lurraldeak eremu desmilitarizatu eta ez-nuklear deklaratu ere.

- **Arantza eta Artaxoako udalak.** Aurreko erabaki bera, aho batez.
- Hainbat udalek mozio ugari onartu zituzten, 1987ko azarotik 1988ko maiatzera bitartean: **Bera** (Estatuko letraduak helegitea jarri zion), **Irurtzun** (uko egiteari eta erreferendumari buruzkoa soilik), **Kaskante** (eremu desmilitarizatuari buruzkoa izan ezik), **Leitza** (beste herri batzuekin koordinatzeari buruzkoa izan ezik), **Lizarrako** (tiro-poligonoa desegitearen alde, aho batez) eta **Zintroniko** (tiro-poligonoa desegiteari buruzkoa soilik).
- **Orduñako udalerria.** 1988ko otsailaren 12an, udalerrian maniobra militarrak egiteari uko egitea onartu zuen.
- **Erandioko Udala.** 1988ko martxoaren 10ean, Eguzkiren mozio bat onartu zuen, Bardeetako tiro-poligonoaren aurka.
- **Sopelako Udala.** 1988ko martxoaren 25ean, Eguzkiren mozioa onartu zuen.
- **Santurtziko Udala.** Tiro-poligonoaren aurkako mozioa onartu zuen, 1988ko apirilaren 29an.
- **Barakaldoko Udala.** 1988ko maiatzaren 28an, Eguzkiren mozioa onartu zuen, Bardeetako tiro-poligonoa desegitearen eta Argalario babestearen alde.
- **Hernaniko Udala.** Tiro-poligonoa desegitearen alde, 1988ko uztailaren 1ean.
- **Errenteriako Udala.** 1988ko uztailaren 4an, jada 1986ko martxoan egin zuen bezala, Bardeetako tiro-poligonoa desegitearen aldeko mozioa onartu zuen.
- **Usurbilgo Udala.** 1992ko urtarrilean, udalerria eremu desmilitarizatu deklaratu zuen.
- **Espainiako Senatua.** 1997ko otsailaren 26an euskal senatari batzuk aurkezturiko mozioaren ondorioz, Senatuak hauek eskatu zituen: “kontratua ez berritzeko, (Bardeetako) tiro-poligonoa desegiteko eta bertako inguruak leheneratzeko, eta bi urteko epean poligonoarentzat beste kokapen bat bilatzeko”.[235]
- **Zarikietako Udala.** 1997an, alkateak, Perdongo Herrien Koordinadorarekin batera, euroarmadak herri-lurrak okupatu izana salatu zuen, Kobra Operazioaren maniobren baitan.
- **Nafarroako Parlamentua.** 1998ko ekainaren 30ean, honako hauek adierazi zituen: 1) Parlamentua bat zetorrela Erriberako udalekin eta Bardeetako Juntarekin, tiro-poligonoaren errentamendu-kontratua amaitu eta gero luzatzen ez jarraitzeari zegokionean (2001ean amaitzen zen kontratua); 2) Protesta irmoa egiten zuela, gau-hegaldien, herrien gainetiko hegaldien, eta tiro-poligonora ariketak egitera joaten ziren ehiza-hegazkinek soinu-langa gainditzearen aurka. 3) Ebazpena Defentsa ministroari eta Nafarroako Gobernuko presidenteari bidaltzea erabaki zuela.
- **Aulestiko Udala.** 1998ko azaroaren 2an, hirigunean bertan eginiko maniobra militarrak salatu zituen. Maniobra horien berri, hain zuzen, egun berean bertan eman zieten, eta ez zen inolako baimenik eskatu. “Ingurumena eta inguruko bazterrak errespetatuko zituztela esan zuten, baina ez dute hori bete”, esan zuen Gema Mendieta alkate andreak. Ehun soldadu inguru herri barruan lasterka aritu ziren, bai eta jausgailuz salto egiten ere, bertako bizilagunak ustekabean hartuz eta ikaratuz.

235 http://es.wikipedia.org/wiki/Pol%C3%ADgono_de_tiro_de_las_Bardenas#Reclamaciones_de_desmantelamiento

- **Gordexolako Udala.** 1998ko azaroaren 4an, protesta ofiziala egin zuen, maniobrek inguruan sortutako eragozpenengatik.
- **Aiarako Udala.** 1998ko azaroaren 5ean, udalak, PP alderdiak izan ezik, udalerrian eginiko maniobra militarrak gaitzestea erabaki zuen. “Okupazio militarra” salatu zuen, “aiararren bizimoduaren harmonia eta lasaitasuna aztoratzen” zuelako eta “alarma nabarmena” eragiten zuelako. Udalari ez zioten baimenik eskatu, eta armadak fax bat bidali zuen jakinarazteko, besterik ez. Ordurako, helikopteroek zenbait ordu zeramatzaten inguru haien gainean hegan egiten, eta soldaduak jada sartuak ziren zenbait udalerritan edo aziendaren bazkalekuetan. Florencio Alamillo alkatearen hitzetan, “faxa guztiz orokorra zen, ez zen adierazten maniobrak non eta noiz egingo zituzten, ezta nolakoak izango ziren ere”.
- **Nafarroako Parlamentua.** UPN alderdiak izan ezik, ganbera horretako gainerako alderdiek Espainiako armadak “Bardeak erabilera militarretarako erabiltzen jarraitzeari beste behin uko egitea” erabaki zuten 2000ko ekainaren 22an.
- **Eibar, Ermua, Deba, Artea, Markina, Mungia eta Arratiako udalak.** Modu batera edo bestera, “Ejercicio Guión 00” izeneko maniobra militarrek (2000ko urriaren 1etik 5era bitartean) kaltetutako udal guztiek salatu zuten baimenik ez zietela eskatu eta jakinarazpen-fax bat baino ez zutela jaso Espainiako Gobernuaren Bizkaiko Ordezkaritzatik. Gobernuaren Gipuzkoako ordezkariordeak ohar soil bat bidali zion Eibarko udalari, “Guión-00 maniobretako zenbait fasek Eibarko biztanle guztiengan edo batzuengan eragina” izango zutela adieraziz. Deban ez zuten ohar hori ere jaso.
- **Aulestiko Udala.** 2000ko urriaren 1etik 5era bitarterako antolaturiko maniobra militarrak (Guión-00) ez egiteko eskatu zion armadari (bi urte lehenago ere egin zituzten), “ez baitugu Euskal Herriko borondatea errespetatzen ez duen armadarik onartzen”.
- **Tuterako Udala.** Bardeetako tiro-poligonoa jarraitzeari uko egin zioten beste behin 2000ko abenduan, kontratua berritzeko garaia heltzean.
- **Dimako Udala.** Espainiako armadari udalerrian egiten ari zen maniobrak bertan behera uzteko eta eremu hartatik joateko eskatzea erabaki zuten 2001eko martxoaren 28an eginiko osoko bilkuran. Udalak “ez du inoiz onartuko Espainiako armadak udalerriaren mugen barruan maniobrak egitea”. Bi urte geroago, 2003ko maiatzaren 29an, EAEANek osoko bilkuraren erabakia baliogabetu egin zuen, jo zuelako udalak administrazio zentralaren eskumenak “oztopatzen” zituela eta indar armatuek soldaduak maniobra militarren bidez prestatzeko duen ahalmena mugatu nahi zuela.
- **Cabanillas, Milagro, Valtierra, Zarrakaztelu eta Azkoiengo udalak.** 2001eko ekainaren 7an, Bardeetako Juntan ordezkaritza duten udalerri horiek ezezko botoa eman zioten Bardeetako tiro-poligonoaren errentamendu-kontratua berritzeari.
- **Etxarri Aranazko Udala.** 2002ko azaroaren 14an, Espainiako armadak bailaran maniobrak egitearen kontrako erabakia onartu zuen udalak, aho batez, eta azpimarratu zuen armadak ez zuela “udalerrian sartzeko baimen formalik”.
- **Bera, Bakaiku eta Iturmendiko udalek** hartutako erabakietan, Espainiako armadari debekatzen zioten beren udalerrietako lurraldea erabiltzea “Operación Guión” izeneko maniobretarako (2002ko azaroaren lehen hamabostaldian).
- **Gasteizko Udala.** 2003ko irailaren 19an, onartu zuen Espainiako Defentsa Ministerioari eskatzea martxan jartzeko negoziazioak, Araka base militarreko lursailen jabetza hirira baldintza onetan transmititzeko (PP alderdiak kontrako botoa eman zuen).
- **Adunako Udala.** 2003ko azaroaren 5ean, alkate andreak jakinarazi zuen Espainiako armadako soldaduak maniobrak egiten ibili zirela “Operación Guión 03” maniobren baitan, “gau

eta egun, eta, dakidanaren arabera, ez dute inolako baimenik eskatu eta ez dute jakinarazpenik bidali. Udalak ez zuen horren berri eta nahi izan duten lekuetan ibili dira".

- **Maruri-Jatabeko Udala.** 2003ko azaroaren 6an protesta adierazi zuen, kamioiek eta armatutako soldaduek udalerria inbaditu zutelako "udalari inork ezer jakinarazi gabe". Beraz, salaketa formala egingo zutela esan zuen, "alarma soziala" sortzeagatik.
- **Laudioko Udala.** Laudioko alkateak "Operación Guión 03" maniobrak "ekintza probokatzailea" zela adierazi zuen (2003ko azaroaren lehen astea).
- **Nafarroako Parlamentua.** 2004ko otsailaren 26an, beste behin ageri zen Bardeetako erabilera militarraren kontra, bai eta tiro-poligonoaren desegite urgentearen alde ere.
- **Orbaizetako Udala.** 2004ko martxoaren 3an, Espainiako armadak maniobrak egiteko eskatutako baimena ez ematea erabaki zuen, aho batez. Hala ere, "maniobrak egingo dira, kosta ahala kosta" erantzun zuten militarrek.
- **Aulestiko Udala.** 2004ko urriaren 6an, udalerriko lurraldeetan maniobra militarrak debekatzea erabaki zuten. 2007an, administrazioarekiko auzien Bilboko auzitegiak erabakia baliogabetu egin zuen.
- **Aguraingo Udala.** 2006ko irailaren 25ean, Espainiako armadari udalerriko lurraldeak ez lagatzea erabaki zuen. Administrazioarekiko auzien Gasteizko auzitegiak erabaki hori baliogabetu zuen.
- **Getxo, Durango, Zornotza eta Elorrioko udalak.** "Almogávares VI" paraxutisten brigadak eta Loiolako eta Mungiako kuarteletako soldaduek 2006ko irailaren 25etik 29ra bitartean eginiko maniobra militarren aurka protestatu zuten. Iñaki Zarraoa Getxoko alkateak "oso protesta irmoa" adierazi zuen Alcalá de Henaresko baseko paraxutistek Ereaga hondartzan eginiko erakusketen kontra.
- **Eusko Jaurlaritza.** 2006ko irailaren 28an, kezka eta haserrea adierazi zuen: "ezin gara isilik egon soldaduek hiriguneak hartzen dituzten bitartean", maniobra horiek "ariketa taktikotzat jo daitekeena baino gehiago baitira, ez baita horrelakorik egiten hiriguneetan".
- **Tuterako Udala.** 2007ko abenduan, tiro-poligonoa erabiltzeko Defentsa Ministerioarekin sinaturiko hitzarmena berritzearen kontrako mozioa onartu zuen, aho batez.
- **Zintronikoko Udala.** 2008ko martxoaren 6an, seigarren aldiz eta aho batez, erabaki hau hartu zuen: "adieraztea, beste behin, udal honek nahi duela Bardeetako tiro-poligonoa desegitea, indarrean dagoen hitzarmena 2008ko abenduan amaitzean, beharrezkoa baita Defentsa Ministerioak poligono horren ordez beste leku bat bilatzea". Halaber, "Defentsa Ministerioari eskatzea tiro- eta bonbardatze-eremuak leheneratzeko plana egiteko eta gauzatzeko. Plan horren baitan, gutxienez, gailu arriskutsu guztiak desaktibatu behar dira, milaka tona txatar atera behar dira eta lurzorua deskontaminatu behar da. Halaber, eskatzea erakunde eskumendunei poligonoak hartzen duen azalera (2.200 ha baino gehiago) babesteko, babes-figuraren baten bidez, uztartuz, batetik, pertsonen segurtasuna, beti baitago gailu arriskutsuak geratzeko arriskua, eta bestetik, bertako landare eta animalien babesa".
- **Salazarreko bailarako udalak.** 2008ko apirilean, zazpi udalek Bardeetako tiro-poligonoa desegiteko eskatu zuten.
- **Nafarroako Parlamentua.** 2008ko martxoaren 13an, Bardeetako tiro-poligonoaren kontratua ez berritzea eta poligonoa desegitea erabaki zuen.
- **Garesko Udala.** 2008ko apirilaren 4ko osoko bilkuran, tiro-poligonoa desegitearen aldeko mozioa onartu zuen.

- **Tafallako Udala.** 2008ko apirilaren 29an, Bardeetako tiro-poligonoa desegiteko eskatzea erabaki zuen, aho batez.
- **Antsoaingo Udala.** 2008ko apirilaren 30ean, tiro-poligonoaren erabilera militarraren kontra eta poligonoaren erabilera naturalista eta ekologista baten alde ageri zen, poligonoa natura-parke batean kokatuta dagoelako eta erabilera hori datorrelako bat natura-parke baten ezaugarriekin. Halaber, eskatu zuen tiro- eta bonbardatze-eremua leheneratzeko plan bat egiteko, eta tiro-poligonoaren errentamendu-kontratua amaitzeko.

### 3.2. Udalerri intsumisoak

Hona hemen horietako batzuk:

- **Orkoiengo Kontzejua.** 1985eko azaroan, Iruñeako Talde Antimilitaristak eskatuta, erabaki hau hartu zuen: “zerbitzu militarra anakronismotzat jotzea, gure garairako batere ez-egokia. Aski frogatu da guztiz alferrikakoa dela, bakearen eraikuntzarekin guztiz bateraezina dela, sekulako gehiegikeria eta bidegabekeria dela, onarpen txikia duela, argi eta garbi, eta anti-demokratikoa dela; beraz, berehala abolitzeko eskatzen dugu”. Espainiako Gobernuaren ordezkariak, Luis Roldánek, erabakiaren kontrako helegitea jarri zuen 1986ko apirilaren 29an.
- **Antsoaingo Kontzejua.** 1985eko azaroan, *Junta de Veintena* delakoak soldadutza anakronikotzat jotzea erabaki zuen, bai eta kontzientzia-eragozpenari buruzko legea eta ordeko gizarte-zerbitzuari uko egitea ere. 1986ko otsailaren 28an, Kontzejuak NATOn sartzeari ezezkoa ematea gomendatu zuen.
- **Atarrabiako Udala.** 1987ko apirilaren 24an, NATOren aurkako udalerria deklaratu zen. Nafarroako Auzitegi gorenak erabaki hori baliogabetu egin zuen 1990eko ekainaren 11n.
- **Usurbilgo Udala.** 1987ko azaroaren 24an, Espainiako armadarekin ez kolaboratzeko erabakia onartu zuen, ez soldadutzarako izen-emateetan, ezta bestelako gaietan ere. 1992an, erabaki horiek berretsi zituen, udalerri desmilitarizatu deklaratu zen eta intsumisoak babesteko konpromisoa hartu zuen. 1994an eta 1996an, Espainiako armadarekin ez kolaboratzeko beste akordio batzuk onartu zituzten.
- **Antzuolako, Lezoko eta Pasaiako udalak.** Armadarekin ez kolaboratzeko erabakia onartu zuten.
- **Gatikako Udala.** 1988ko azaroaren 2an, ordezko gizarte-zerbitzuaren eta Kontzientzia-eragozpenari buruzko Legearen kontrako jarrera adierazi zuen.
- **Arroizko Udala.** 1988ko azaroaren 15ean, derrigorrezko soldadutzaren kontrako mozioa onartu zuen.
- **Trapagarango Udala.** 1988ko abenduaren 9an, ordezko gizarte-zerbitzuaren kontrako eta kontzientzia-eragozpenaren aldeko mozioa onartu zuen.
- **Ordiziako Udala.** 1988ko urtarrilaren 4an eginiko osoko bilkuran, gazteak errekrutatzeari eta elkarte militarrekin kolaboratzeari uko egiteko erabakia onartu zuen. Bi urte geroago, 1990eko maiatzaren 2an, udal-erabaki hori berretsi zuen.
- **Ondarroako Udala.** 1988ko maiatzaren 11n eginiko osoko bilkuran, “edonork du Espainiako armadan soldadutza ez egiteko eskubidea” onartu zuen. Halaber, manifestazio baterako deia egin zuen, “Mikel (Odriozola) askatu” lelopean. Mikel Odriozola atxilotutako intsumiso bat zen, eta manifestazioa maiatzaren 13rako antolatu zen.

- **Berako Udala.** 1990eko urtarrilaren 6an, soldadutzarako izen-emateen lanak ez egitea erabaki zuen, soldadutzari eta Kontzientzia-eragozpenari buruzko Legeari uko egin ondoren.
- **Olaztiko Udala.** 1990eko otsailaren 20an, gazteei Espainiako armadako soldadutzari objekzioa egiteko eskatu zien, eta Kontzientzia-eragozpenari buruzko Legeari uko egin zion. Intsumisoen aldeko beste erabaki bat onartu zuen 1990eko maiatzaren 24an.
- **48 udal.** 1990eko apirilaren 1ean, HB alderdiaren mozioetan proposatutako eta udal horietako plenoetan onarturiko intsumisio-deklarazioa martxan jartzea erabaki zuten.
- **Sunbillako Udala.** 1990eko apirilaren 20an, hiru mozio onartu zituen: 1) soldadutzari uko egitea; 2) Espainiako armadarekin kolaboratzeari uko egitea; eta 3) udalerriko gazteen artean kontzientzia-eragozpena sustatzea.
- **Bergarako Udala.** 1990eko maiatzaren 7an, aho batez, Talde Antimilitaristak Marcos Pérez intsumisoaren askatasuna eskatzeko aurkeztutako mozioa onartu zuen.
- **Altsasuko eta Iturmendiko udalak.** Altsasuko intsumiso batekiko elkartasuna adierazi zuten 1990eko maiatzaren 24an.
- **Bilboko Udala.** 1990eko ekainaren 14an, “armadarekin inolako kolaboraziorik izatearen kontra” azaldu zen. 1991ko otsailaren 25ean, Asier Sánchez eta Oscar Vicente “askatzeko modua aztertzeko” eskatu zien agintari eskudundunei.
- **Lezoko Udala.** 1991ko abuztuaren 14an, José Mari Alzaguren eta espetxeratutako intsumiso guztiak askatzeko eskatzea erabaki zuen, armadaren eta gobernuaren errepresiozko politika kondenatu zuen, Alzagurenen auzibidean autoinkulpatu zen, eta soldadutzaren kontrako jarrera hartu zuen. 1990eko azaroaren 9an, “udalerri intsumiso” deklaratu zen, eta korporazioko HBko kideek intsumiso gisa autoinkulpatu ziren (hori egiteagatik, epailearen aurrean deklaratu behar izan zuten 1991ko maiatzaren 14an).
- **Hernaniko Udala.** 1990eko abuztuaren 10ean, Agustín Ezponda alkatea eta HB, EA eta EE alderdietako zinegotziak autoinkulpatu ziren Xabier Balerdi intsumisoaren auzibidean. Gauza bera egin zuten beste lau zinegotzik, Xabier Huizi intsumisoaren auzibidean.
- **Andoaingo Udala.** 1990eko azaroaren 16an, elkartasuna adierazi zion Asier Garmendia intsumisoari, haren auzibidean autoinkulptau zen, Kontzientzia-eragozpenari buruzko Legeari uko egin zion, eta errepresio selektiboa salatu zuen. 1991ko ekainaren 4an, talde antimilitaristak Imanol Huiziren alde aurkezturiko mozioa onartu zuen. Osoko bilkura haren auzibidean autoinkulpatu zen (HB, EA eta EE alderdiek eman zuten aldeko botoa). 1995eko abuztuaren 2an, armadarekin ez kolaboratzeko hartutako erabakia baliogabetu zuen Euskal Autonomia Erkidegoko Justizia Auzitegi Nagusiak.
- **Ataungo Udala.** 1990eko azaroaren 16an, Iñigo Aldasoro intsumisoaren atxiloketa salatu zuen, haren auzibidean autoinkulpatu zen eta horrek eragindako gastuak bere gain hartzea erabaki zuen.
- **Gasteizko Udala.** 1990eko azaroaren 17an, CDS, EAJ, EA, EE eta HB alderdien aldeko botoez, José Andrés Rodríguez intsumisoarekiko babesa adierazi zuen (Guardia Zibila intsumiso horren bila zebilen).
- **Busturiako Udala, Lekeitioko Udala, Laudioko Udala eta beste 43 korporazio.** 1990ean, “Espainiako armadarekin inolako kolaboraziorik izateari” uko egitea erabaki zuten. 1990eko azaroaren 19an, Euskal Autonomia Erkidegoko Auzitegi Nagusiak ebazpena eman zuen, puntu hori bertan behera utzarazteko.
- **Billabonako Udala.** 1990eko abenduaren 12an, armadarekin ez kolaboratzea erabaki zuen, bai eta objektatu nahi zuten gazteentzako informazio-bulego bat irekitzea ere.

- **Errenteriako Udala.** 1991ko urtarrilaren 30ean, Josetxo Almandozen kontrako gerra-kontseilua eta intsumiso eta kontzientzia-eragozleen kontrako eginbideak bertan behera uzteko eskatu zuen. Halaber, epaiketaren gastuak bere gain hartzea erabaki zuen, eta Almandoz aske uzteko eskatzea.
- **Barakaldoko Udala.** 1991ko urtarrilaren 31n, elkartasuna adierazi zion Josetxo Almandoz kontzientzia-eragozleari.
- **Bilboko Udala.** 1991ko otsailaren 25ean, "agintari eskumendunei Asier Sánchez eta Oscar Vicente intsumisoak aske uzteko modua aztertzeko eskatzea" erabaki zuen, bai eta lege-aholkularitzako udaleko zerbitzuak haiei eskaintzea ere.
- **Lizarra-Estellako Udala.** Madrilen 1991ko ekainaren 21ean Xabier Zurbano intsumisoaren aurkako epaiketa zela-eta, hura absolbitzeko eta auzibidea bertan behera uzteko eskatu zuen.
- **Zizurkilgo Udala.** 1991ko abuztuaren 26an, derrigorrezko soldadutza abolitzeko eskatu zuen. Halaber, udalerako lan egiteko, eskakizun hori ez egoteko eskatu zuen.
- **Orbaizetako Udala.** 1991ko urriaren 8an, aho batez, armadarekin kolaboratzeari uko egiteko erabakia onartu zuen, ondoz ondoko hirugarren legegintzaldiz.
- **Etxarri Aranazko Udala.** 1991ko abenduaren 14an, Espainiako armadari auzia jartzea erabaki zuen, Unai Jaka Karrera herriko intsumisoaren atxiloketarengatik.
- **Lekeitioko Udala.** 1991ko amaieran, gazteak soldadutzarako errekrutatzeari uko egitea erabaki zuen.
- **Zumarragako Udala.** 1977an jaiotako gazteen izen-zerrenda Gipuzkoako errekrutatze-zentroko teniente koronel buruari ez bidaltzea erabaki zuen.
- **Bakaikuko Udala.** Javier Aiestaran alkatearekiko elkartasuna adierazi zuen (intsumiso izateagatik atxilotu zuten), 1993ko martxoaren 12an. Erabaki horretan, intsumisioaren alde egin zuten, bai eta adierazi ere "inoiz ez dadila hartu kontuan derrigorrezko soldadutza egin izana lanpostu bat emateko; soldadutza egindakoek ez dezatela horregatik puntuazio positiborik jaso, ezta egin ez dutenek puntuazio negatiborik ere".
- **Bargotako Udala.** 1994ko martxoaren 8an, intsumisioaren aldeko beste mozio bat onartu zuen.
- **Eusko Legebiltzarra.** 1993ko maiatzaren 14an onarturiko ez-legezko proposamenean, intsumisioa despenalizatzeko eskatu zien aginte eskumendunei.
- **Nafarroako Parlamentuko Giza Eskubideen Batzordea.** 1993ko uztailaren 22an, intsumisioaren alde egitea erabaki zuen.
- **Tafallako, Zintronikoko eta Zarrakaztelu-Carcastilloko udalak.** 1993ko abuztuaren 2an, intsumisoen aldeko mozio bana onartu zuten.
- **Sunbilla, Garralda, Olazti, Etxalar, Etxarri Aranatz, Ezpartza (Salazarrekoa), Orbara, Arantza, Lesaka, Orbaizeta, Amezkoa Behekoako udalak eta Labianoko Kontzejua.** 1993ko abuztuan, kontzientzia-eragozleen eta objektoreen senideen elkarteak intsumisioaren alde aurkeztutako mozioa onartu zuten.
- **Agoizko Udala.** 1993ko azaroaren 2an, Xabier González herriko intsumisoaren alde egiteko erabakia onartu zuen.
- **Eusko Legebiltzarra.** 1995eko martxoaren 24an, intsumisoak aske uzteko eskatu zuen.

- **Euskal Herriko 35 udal: Aizarnazabal, Ajangiz, Altsasu, Andoain, Anoeta, Antzuola, Aramaio, Arrasate, Astigarraga, Aulesti, Beizama, Belauntza, Bergara, Bermeo, Dima, Elduain, Gatika, Goizueta, Hernani, lrura, Itsasondo, Leaburu, Legazpi, Lekeitio, Lezo, Lizartza, Oiartzun, Olazti, Orexa, Samaniego, Usurbil, Zaldibia, Zestoa, Ziordia** eta **Zizurkil.** 1996ko maiatzaren 18an, Oiartzunen, Euskal Udalerri Intsumituen Mankomunitatea (EUDIMA) eratzea erabaki zuten. EAEANek 2000ko apirilaren 10ean emandako epaiak EUDIMAren estatutuak onartzeko akordioa baliogabetu egin zuen, "intsumisioa bultzatzeko legez kanpoko helburua" zutelako.
- **Donostiako Udala.** 1997ko urtarrilaren azken astean, Kode Penal berria aintzat ez hartzea erabaki zuen, eta Justiziak langile publiko izateko gaitasunik gabe utzitako intsumisoak onartzea.
- **Pasaiako Udala.** 1997ko azaroaren 24an, HB eta PSE-EE alderdien aldeko botoez, eta EAJ eta EA alderdien ezezko botoez, Xabier Portugal alkate ohiaren (HB) eta Bixen Itxaso alkatearen (PSE) aurka desobedientziagatik abiatutako jardunbidea salatzea onartu zuen. Halaber, eskatu zuen jardunbide hori bertan behera uzteko, bai eta alkatea eta alkate ohia absolbitzeko ere –izan ere, osoko bilkuraren erabakia bete baino ez zuten egin biek–.
- **Abadiñoko Udala.** 1999ko azaroaren 25ean, aho batez (PP, PSE, PNV, Abadiñoko Independenteak eta EH), soldadutza guztiz desagertzearen alde azaldu zen, eta ekimenak (esaterako, Intsumisio Eguna) bultzatzen jarraitzea erabaki zuen, desmilitarizazioa lortu arte.
- **Eusko Legebiltzarra.** 2000ko maiatzaren 5ean onarturiko ez-legezko proposamenean, Espainiako armadarekin ez kolaboratzeko erabakia hartu zuen, eta horrela egiteko eskatu zien Arabako, Bizkaiko eta Gipuzkoako erakundeei, gizarte-erakundeei eta, oro har, hiritar guztiei.
- **Arrasateko Udala.** 2002ko otsailaren 15ean, Auzitegi Gorenak erabaki zuen udalak hartutako erabakiak (armadarekin ez kolaboratzea, gazteen soldadutzarako izen-ematea ez egitea, ordezko gizarte-zerbitzuak ez onartzea, herriko intsumisoen defentsa-gastuak udalak bere gain hartzea) Estatuak defentsaren eta indar armatuen alorrean dituen eskumenak urratzen zituela. Hala ere, tokiko autonomiaren esparruaren baitan, udalari onartu zion bazuela intsumisoen aurkako epaiketen gastuak bere gain hartzea, Korporazioren gizarte-helburu baten adierazpen gisa.
- Hona hemen beste udal intsumiso batzuk: **Aduna, Agurain, Alegia, Altzo, Aranguren, Arratzu, Artaxoa, Asteasu, Ataun, Bera, Berriozar, Errezil, Etxauri, Etxebarria, Gernika, Ikaztegieta, Larraun, Leitza, Nabarniz, Sukarrieta, Tolosa, Ubide, Urdiain, Urretxu, Zarautz, Zeanuri** eta **Zumaia.**

## 3.3. Osoko bilkuretan armadarekin ez kolaboratzearekin lotuta hartutako udal-erabakiengatik atxiloturiko hautetsiak eta izandako epaiketak:

- **Etxarri Aranazko alkatea.** 1993ko apirilaren 23an, Manolo Campos epaitu zuten, Espainiako armadarekin ez kolaboratzeagatik.
- **Bargota, Ziordi, Urdiain eta Larraungo alkateak.** 1993ko maiatzaren 5ean, Nafarroako Auzitegiko Fiskaltzak udalerri horietako alkateak -Pablo Llorens, Jesús Miguel Casas,

Mikel Agirre eta Pedro Manuel Barbería, hurrenez hurren- deitu zituen deklaratzera, armadarekin ez kolaboratzearekin lotuta osoko bilkuretan hartutako erabakiei buruz.

- **Lekeitioko alkatea eta zinegotzi batzuk.** 1993ko ekainaren 17an Instrukziozko Gernikako Epaitegian deklaratzera deitu zituzten, osoko bilkuran hartutako erabakiagatik (herriko gazteak Espainiako armadan soldadutza egiteko errekrutatzeari uko egitea).
- **Etxebarriako alkatea eta zinegotziak.** 1993ko uztailaren 5ean, Gernikako Epaitegian deklaratu zuten, 1991ko erabaki batengatik (armadarekin kolaboratzeari uko egitea).
- **Orbaizetako alkatea.** 1993ko irailaren 9an, Malli Txapar alkatea epaitu zuten, osoko bilkuran hartutako erabakia betetzeagatik (Espainiako armadarekin kolaboratzeari eta soldadutzara joateko adinean dauden gazteen zerrendak argitaratzeari uko egitea). Sei urte eta egun bateko desgaikuntza bereziko zigorra jarri zioten, desobeditze-delituagatik, bai eta 100.000 pezetako isuna ere.
- **Bargotako alkatea.** 1994ko abuztuaren 30ean, Pablo Llorens Bargotako alkateak Lizarrako instrukziozko epailearen aurrean deklaratu zuen, armadarekin ez kolaboratzeagatik. 1995eko martxoaren 17an epaitu zuten, eta sei urteko desgaikuntzako zigorra jarri zioten.
- **Antzuolako alkatea.** Gipuzkoako Auzitegiko I. aretoak emandako epaiaren bidez, Roke Iñarrari (EAJ) sei urteko desgaikuntzako zigorra jarri zioten.
- **Aizarnazabal, Zestoa eta Errezilgo alkate ohiak.** 1995eko uztailaren 4an, herri horietako alkate ohiak (Maria Jose Korta, Xanti Sagarzazu eta Jose María Zinkunegi, hurrenez hurren) atxilotu eta Azpeitiko epaile andrearen aurrera eraman zituzten, derrigorrezko soldadutzarako gazteen izen-emateko prozeduran kolaboratzeari uko egiteagatik.
- **Etxauriko alkate ohia.** Emilio Satrustegi epaitu zuten Iruñean. Sei urteko desgaikuntzako zigorra jarri zioten, bai eta 100.000 pezetako isuna ere.
- **Orbaizetako eta Sukarrietako hautetsiak.** 1995eko abenduaren 15ean epaitu zituzten, armadarekin ez kolaboratzeagatik. Alkatea, Jesús María Txapar Apezarena, 1993an epaitu zuten.
- **Zizurkilgo alkatea.** 1996ko maiatzaren 10ean, Ertzaintzak Mikel Arrastoa alkatea atxilotu zuen, udalak armadarekin ez kolaboratzeagatik deklaratzeko.
- **Usurbilgo alkatea.** 1996ko azaroaren 5ean, Ertzaintzak José Antonio Altuna atxilotu zuen, aurretik epaitegiko hiru deialdiri ez erantzun eta gero. 1997ko azaroaren 20an berriro atxilotu zuten, deklaratzera eramateko, udalak armadarekin ez kolaboratzeagatik. 1998ko ekainean, Ertzaintza berriz joan zen haren bila, epailearengana eramateko, 1987an onarturiko mozio bati buruz deklaratzeko. Zenbait aldiz saiatu ziren alkatea epaitzen, baina epaiketak bertan behera utzi behar izan zituzten, alkateak itzultzaileak itzulitakoa gezurtatu egin baitzuen. Azkenik, 1999ko azaroaren 9an epaitu zuten, baina aske utzi zuten kargurik gabe. Gero, 2000ko urtarrilaren 18an, berriz epaitu zuten, 1994ko eta 1996ko mozio batzuengatik. Urtebeteko desgaikuntzako zigorra jarri zioten, eta 250.000 pezetako isuna.
- **Gipuzkoako foru-diputatua eta Zumarragako alkate ohia.** 1997ko urtarrilaren 7an, Jose Julian Irizar diputatua epaitu zuten, 1994an, Zumarragako alkate zenean, Espainiako armadarekin errekrutatze-lanetan ez kolaboratzeagatik. Absolbitu egin zuten.
- **Aizarnazabalgo alkatea.** 1997ko otsailaren 5ean, Jose Narbarte atxilotu eta Azpeitiko epaitegira eraman zuten, armadarekin kolaboratzeari uko egin izanagatik deklaratzeko.
- **Alegiako alkatea.** Genaro Bordegarai, EAko alkatea, atxilotu eta deklaratzera eraman zuten.

- **Leaburu-Gazteluko alkatea.** 1997ko otsailaren 19an, Jose Cruz Goñi alkatea atxilotu zuten, udalak armadarekin ez kolaboratzeagatik deklaratzeko.
- **Ziordiko eta Etxauriko alkateak.** 1997ko apirilaren 14an, Guardia Zibilak Alejandro Labiano Etxauriko alkatea eta Mikel Casas Ziordiko alkatea atxilotu zituen, haien udalek Armadarekin ez kolaboratzeagatik deklaratzeko.
- **Artaxoako alkatea.** Juanje Soria abokatuak defendatu zuen.
- **Goizuetako alkate andrea.** 1997ko apirilaren 15ean, Guardia Zibilak Pilar Urtxalo atxilotu zuen, udalak armadarekin ez kolaboratzeagatik deklaratzeko.
- **Anoetako alkatea.** 1997ko ekainaren 13an, Jose Maria Sarasola alkatea atxilotu zuten, udalak armadarekin ez kolaboratzeagatik deklaratzeko.
- **Lezoko alkatea.** 1997ko abuztuaren 19an, Mikel Arrizabalaga alkatea atxilotu zuten, gazteak errekrutatzearekin lotutako lanetan udalak armadarekin ez kolaboratzeagatik deklaratzeko.
- **Belauntzako alkatea.** 1997ko azaroaren 24an, Jose Maria Jauregui alkatea atxilotu zuten.
- **Pasaiako alkatea eta alkate ohia**. Desobeditzeagatiko jardunbidea abian jarri zizkieten Xabier Portugal alkate ohiari (HB) eta Bixen Itxaso orduko alkateari (PSE).
- **Orexako alkatea.** Joseba Elola arrazoi bera dela-eta atxilotu zuten, 1997ko azaroaren 25ean.
- **Asteasuko alkatea.** 1997ko azaroaren 26an, Andoni Iturbe alkatea atxilotu zuten, arrazoi beragatik; hau da, armadarekin ez kolaboratzeagatik.
- **Lizartzako alkatea.** 1998ko azaroaren 20an, Ertzaintzak Jose Antonio Mintegi atxilotu eta Tolosako Epaitegira eraman zuen, Espainiako armadarekin kolaboratzeari uko egiteagatik.
- **Urretxuko alkatea**. Bi urtez kargurik gabe izateko zigorra jarri zioten, eta beste epaiketa bat izatekoa zen, 1998an armadarekin ez kolaboratzeagatik.
- **Tolosako alkatea**. 1998ko azaroan, arrazoi bera dela-eta epaitzeke zegoen.
- **Lezoko alkatea.** 1998ko azaroaren 24an, armadari laguntza ukatzeagatiko delitutik absolbitu zuten Mikel Arrizabalaga. 2002ko abenduaren 10ean, berriz epaitu zuten, zazpi urte lehenago "obligazio militarrak ez betetzeagatik", derrigorrezko soldadutza egiteko adinean zeuden Lezoko gazteen zerrenda ez baitzion bidali Espainiako armadari.
- **Dimako korporazioa.** 1999ko urriko 20an, udal korporazio osoa absolbitu zuten. Espainiako armadarekin ez kolaboratu izanaz akusatu zituzten.
- **Arrasateko alkatea.** Donostian 2001eko maiatzaren 4an eginiko epaiketaren ondoren, "Armadari laguntza-ukatzeagatiko delituaz" absolbitu zuten Xabier Zubizarreta. Ondoz ondoko hiru urtetan, aginte militarrak ez zituen jaso herriko errekrutatze-zerrendak, baina Zubizarreta aske utzi behar izan zuten, ez baitzen frogatu bera zenik gertaera horren erantzulea.
- **Zarauzko alkatea.** 2002ko otsailaren 18an, Donostiako zigor-arloko 1 zenbakiko epaitegiak bi urte kargu publikorik gabe izateko zigorra jarri zion Imanol Muruari (EAren bozeramailea zen Gipuzkoako Batzar Nagusietan), bai eta 2.160 euroko isuna ere, laguntza ukatzeagatiko delituagatik, 1997an, Zarauzko alkatea zenean, ez baitzizkion eman armadari soldadutzara joan behar zuten gazteen zerrenda.

# BESTE ARGITALPEN INTERESGARRI BATZUK


- AHEDO GURRUTXAGA, Igor: *El movimiento Demo y la nueva cocina vasca (desobediente)*, Alga-Alberdania, Irun, 2004.
- BOVÉ, José; DUFOUR, François: *El mundo no es una mercancía*, Icaria, Bartzelona, 2001.
- CASADO DA ROCHA, Antonio; PÉREZ, José Antonio: *Itoiz. Del deber de la desobediencia civil al ecosabotaje*, Pamiela. Iruñea, 1996.
- CASADO DA ROCHA, Antonio: *La desobediencia civil a partir de Thoreau*, Gakoa, Donostia, 2002.
- MULLER, Jean-Marie: *El coraje de la no violencia*, Sal Terrae, Santander, 2004.
- OLIVER OLMO, Pedro: *La utopía insumisa de Pepe Beunza*, Virus, Bartzelona, 2002.
- ORTEGA, Pere; POZO, Alejandro: *Noviolencia y transformación social*, Icaria, Bartzelona, 2005.
- PÉREZ, José Antonio: *Manual práctico para la desobediencia civil*, Pamiela, Iruñea, 1994.
- SHARP, Gene: *La lucha política no violenta: criterios y métodos*, Albert Einstein Institutua. PDF formatuan irakurtzeko, ikus hemen: http://www.antimilitaristas.org/spip.php?article2455 http://www.revistafuturos.info/resenas/resenas13/lucha_noviolencia.htm http://bjcu.uca.edu.ni/pdf/m/metodos_sharp.pdf
- TXAPARTEGI, Ekai: *Desobedientziaz ibiltzen*, Txalaparta. Erriberri, 2005.
- ZENBAITEN ARTEAN: *Jornadas sobre Noviolencia Activa*, Gipuzkoako Eragozpen Taldea (www.bideahelburu.org).
- ZENBAITEN ARTEAN: *En legítima desobediencia. Tres décadas de objeción, insumisión y antimilitarismo*, MOC.,Traficantes de Sueños, Madril, 2002.
- ZENBAITEN ARTEAN: *Manual de Acción Directa Noviolenta*, Utopía Contagiosa Taldea. Ikus hemen: http://utopiacontagiosa.wordpress.com/2007/07/18/manual-de-accion-directa-noviolenta/
- ZENBAITEN ARTEAN: *Manual para Campañas Noviolentas*, War International Resisters Taldea (WIR). Hemen eskuragarri (ingelesez; laster, gazteleraz): http://wri-irg.org/node/3855. Kopiak eskatzeko: info@wri-irg.org
- ZENBAITEN ARTEAN: *Mercaderes de la muerte made in Euskadi. La industria militar en Euskal Herria*, Gasteizkoak (gasteizkoak@gmail.com), Zapateneo, Gasteiz, 2008.
- ZENBAITEN ARTEAN: *Mil coces contra la disidencia y Mil (y 2) coces contra la disidencia*, 2003 eta 2005. PDF formatuan irakurtzeko, ikus hemen: http://www.joxemizumalabe.org/sosjoxemiblog/?p=182